**BURDINEN ARTEKO HERRIA**
Euskal Preso Politikoen Kolektiboaren historia

## AURKIBIDEA

*Herri konkistatua da gurea,*
*denok dakigunez,*
*baina Euskal Herria garaitu duenik*
*ez da egon gaur arte.*
*Ondorioz, biolentzia,*
*heriotza eta kartzela*
*konstante bat izan dira historian,*
*ondoko gertakari-katean*
*ondo antzematen den bezala.*

Nafarroako inbasioak eta konkistak eragindako gerra (1512-1530) ez zen paseo militar bat izan. Armada konkistatzaileek eta Nafarroako armadek behin eta berriz egin zituzten erasoak eta kontraerasoak. Hirien setio luzeak gertatu ziren, hainbat gotorlekuri eraso zieten, eta ez zuten amore eman harik eta Nafarroako defentsa sistema osoa eraitsi eta suntsitu zuten arte: gotorlekuak, gazteluak, harresiak... 1521eko ekainaren 30ean, lur zabalean egindako Noaingo borroka handia gertatu zen. Baina, batez ere, ezin konta ahala borrokatxo, arpilatze, konfiskazio, atxilotze, kartzelatze, tortura, deserriratze eta hilketa gertatu ziren. Simancaseko presondegian labainaz erail zuten nafarren erresistentziaburu zen Pedro Marsikala 1522. urtean. Horrenbestez, kartzelak bere odol-kuota erreklamatzeari ekin zion estreinakoz.

Sorgin-ehiza entzute handiko arazoa izan zen Nafarroan Aro Berrian, batez ere XVI. eta XVII. mendeetan. Gertakari haiek, orokorrean, Europako zenbait eskualdetan garrantzi handikoa izatera heldu baziren ere, Euskal Herrian -Nafarroan eta Lapurdin batez ere- izugarriak izan ziren. Tortura tartean, akusatuen defentsarako jartzen ziren bitartekoak hutsaren hurrenak ziren, eta zigorra kontu segurua. Zugarramurdi, Urdazubi, Sara, eta, oro har, Gipuzkoako mugatik Erronkariraino hedatu zen, mendialdealdean zehar. Kartzelaldian baldintza oso kaskarrak zeuden eta ondorioz, ezinbestean, hildakoak. Horren adibiderik esanguratsuenetakoa 1612an, Inkisizioak Zugarramurdin egin zuen triskantza da. Alegia, berrogei bizilagun auzipetu zituen sorginak zirelakoan, eta horietatik hamabi sutan erre zituzten. Besteak beste, deabrua Jainkotzat hartzea, itsasoan ekaitzak sortzea, meza beltzak ospatzea, eta animaliei zein pertsonei begizkoak egitea leporatu zieten.

Auzipetuek urte horretan bertan jaso zuten epaia; hemezortzi errugabe jo zituzten, hamabik heriotza-zigorra jaso zuten (sutan erre behar zituzten guztiak, baina horietatik bost kartzelan hil ziren, aurretik) eta, gainerakoek, berriz, bestelako zigorrak izan zituzten, batzuek biziarteko kartzela-zigorra jaso zutelarik.

Iparraldeko herrialdeetan, antzeratsu. Gerra eta kartzela, lege. Bernard Goyheneche-koa, Matalas, Mithikile herrian jaio zen, eta Lextarren hil zuten 1661eko azaroaren 8an. Apaiz ikasketak Bordelen egin zituen eta Zuberoako Mithikile bere herriko erretorea zenean nobleen aurkako matxinada piztu zen, 1661eko ekainean. Nobleak, Iruriko kondea tarteko, eta Mauleko burgesia zituen etsai Matalasek eta haien aurkako erasoa jo zuten bildutako lauzpabost mila lagunek. Urriaren 12an borrokatu ziren Sutan Matalasen laborariak ia-ia armarik gabe eta Bordeletik bidalitako 100 zaldizko eta 400 oinezko gudari guztiz armatuak. Jauntxoek eta Bordeleko tropek, arras menderatu zituzten laborariak. Matalasek ihes egitea lortu zuen, baina Jentañeko dorretxean hartu zituzten preso Matalas eta bere laguntzaile hurkoak. Mauleko gaztelura eraman zituzten eta epaitu ondoren, urte bereko azaroaren 8an hil zuten Matalas. Lextarreko plazan lepoa moztuta hil zuten Matalas eta haren burua gazteluko kanoi-zulo batean jarri zuten; gero, Mauleko sarreran ezarri zuten haren burua bolada batez, jende guztiaren zentzagarri.

Euskal Herrian bete-betean bizitu ziren XIX. mendeko gerra karlistak. Bertan, dinastien inguruko gatazka baten haritik, aurrez aurre izan ziren bi bando. Batetik, ikuspegi foralista, garai hartan Antzinako Erregimeneko nobleziari eta nekazariei lotutakoa eta, batez ere, herri xehearen Foruekiko atxikimendua oinarri zuena; bestetik, hasi berria zen ikuspegi estatalista, burguesia liberal berriaren ingurukoa. 1876an, Bigarren Gerra Karlistaren amaieran, foruak indargabetu zituzten eta aduanak itsasertzera eta Frantziarekiko mugara lekualdatu zituzten. Kartzela eta erbestea ezagutu zutena ere baziren egon, baina XIX. mendearen amaieran nazionalismo modernoa sortu zen, eta estatu zentralistak berehala kokatu zuen bere mamu-zerrendaren goiburuan.



1895. urteko abuztuaren 26an kartzelan sartu zuten, lehen aldiz, Sabino Arana politikari bizkaitarra. "*Matxinatzeko deia*" leporatu zioten, Bizkaitarra aldizkarian argitaraturiko artikulu baten harira. Garai hartan independentziaren alde egiten zuen politikariaren kontrako zor-

tzigarren salaketa zen. Lehen ere sei aldiz epaitua izan zen. Irailean aldizkaria eta Euskeldun Batzokija elkartea itxi zituzten. Hurrengo urteko urtarrilaren 13an askatu zuten.

Hamarkada batzuk geroxeago, mobilizazio politikoak eta 1931ko apirilaren 12ko udal-hauteskundeetako emaitzek errepublikanoen eta sozialisten arteko koalizioen garaipena ekarri zuten. Alderdi dinastikoak desegin egin ziren eta Alfontso XIII.a atzerrira joan zen. Euskal Herrian, baina, errepresioa ez zen baretu, eta abertzalegoak jarraitu zuen jopuntuan. Kartzeladiak arrazoi ezberdinengatik sufritu ziren, ondokoak adibide. Eusko Alderdi Jeltzaleko mitinlari ospetsua izan zen Polixene Trabudua 36ko gerraren aurretik, Haydée Agirre, Julene Urzelai eta Maria Teresa Zabalarekin batera, emakumezko laukote famatuko kide.

1933ko urtarrileko goiz batean, Polixene eskola ematen ari zela, gelditu zen Sondikako ikastola aurrean auto beltz handi bat. Txoferra barruan utzi eta hiru gizon jaitsi ziren, gabardina eta sonbrerodunak. Poliziak ziren eta irakaslearen bila zetozen. Umeak bakarrik utzi eta han eraman zuten Polixene Indautxuko komisaldegira. Bertan zegoen jada Haydée Agirre, bere herrian, Santurtzin, atxilotua. Poliziek biak sartu kamioneta ofizial batean, eta ez deklaraziorik hartu eta ez besterik, eraman zituzten goardia uniformedun eta guzti Larrinagako kartzelara, Amilibia gobernadore zibilaren aginduz. Arrazoia, nonbait, mitin batean independentziaren alde aritu izana. Hamabost egun egin zituzten itzalean Haydéek eta Polixenek. Argazki bat geratu da historiarako, bi emakumeak burdinazko hesiaren atzetik ageri zirenekoa.

1934ko urriko Iraultzan herri-altxamenduak asteak iraun zituen eta gogorki zapaldua izan zen ejertzitoaren eskutan. Batik bat Asturiasen hartu zuen indarra, baina Euskal Herrian ere eragina izan zuen hainbat tokitan. Askoren artean, Altsasuko jazoerak ekarriko ditugu gogora:

> *Asturiaseko errepresioari erantzunez, tren geltokiko kamioi bat irauli zuten Altsasun. Egun batzuetara, lehergai bat jarri zen. Honen ondorioz, atxiloketa ugari eman ziren Altsasun. Constantino Salinas zinegotzi sozialista izandakoa preso zeramatela, Eguzkitza izenez ezaguna zen altsasuarrak bere semea besoetan zuela protesta egin zuen. Guardia Zibilak tiro egin zuen eta zerraldo erori zen Eguzkitza.*

Errepresioak ezkertiar kutsuko alderdi eta elkarteen batasuna ekarri zuen. Frente Popular delakoan bildu ziren ezkertiar indar gehienak.






***Donostian, 1934an egin zen manifestazio baten irudia. Preso politikoen kaleratzea indar handiz erreibindikatu zen.***

36ko hauteskundeei begira, Euskal Herriko presoak, amnistia berri baten esperoan, ezkertiar kutsuko botoa ematera animatu zituzten herritarrak.

Espainiar errepublikarekin kartzelako itzala ezagutu genuen euskaldunok, baina 1936ko matxinada faxista zela medio, gure Herri osoa bilakatu zen kartzela. Molaren armada lau herrialdeetan sartu ahala, hilketak eta espetxeratzeak masiboki gertatu ziren, eta milaka herritarrek galdu zuten askatasuna. Hamarkada luzeetan jarraitu dugu modu berean.

Gerra ondokoan, Euskal Herriko espetxeetako baldintzak oso gogorrak ziren, ez jakirik, ez urik. Larrinaga, Ondarreta, Gasteiz, Langraiz, Iruñea, Ezkaba eta Saturrarango *(azken hau emakumeentzakoa)* kartzeleetan milaka preso zeuden, eta garaiko estatistikak zioena baino heriotze tasa handiagoa nozitu zuten bertantxe. Esaterako, meningitis izurrite batek egundoko sarraskia eragin zuen Saturraranen ama-umeen artean eta biriketako gaitzek ezkutuko kanposantu bat egin eta betetzera behartu zuten 1942an Ezkaba mendiko magaletean. Hiltzeko zuloak ziren Francoren kartzelak.

Euskal preso politikoak, bestaldetik, penintsulan barrena sakabanatuak zeuden. Seirehun preso sartu zituzten Burgosen. Hurrengo orrialdean ikus daitekeen argazki famatu batean, ondo jantzita eta itxura hobean zegoen euskal gudarosteko ofizial izandako talde bat dago, nahiz eta heriotzzigorra ezarri zitzaien guztiei. Urtebete beranduago haietako batzuk biluzik agertu ziren espetxe bereko dutxetan egindako beste argazki batean, eta itxura aldaketa izugarria zen: Europako gainerako kontzentrazio zelaietan naziek gordetzen zituzten gainerako presoen itxura berarekin, gai-

xorik, indarge eta zargailak zeuden. Askok eta askok euren familiekin galdu zuten harremana eta inguruko herriskatan afusilatu zituzten.

Beste lekualdatzeak egon ziren, besteak beste, Cuéllar *(Segovia)*, Dueñas *(Palencia)*, Puerto de Santa María *(Cádiz)* eta Carmona-ra *(Sevilla)*. Oro har, penintsulako ertain, txiki edota tamaina handiko kartzela guztietan egon ziren euskal presoak. Areago, 1938ko abuztuan guztiak Fernando Poo-ko kolonia afrikarraraino eramango zituztela zabaldu zen marmaketa gisa. Parisen Euzko Deya agerkariak albiste bezala ere jaso zuen. Esamesa ez zen baieztatu, baina Guineara eraman beharrean bederatzi preso bai eraman zituzten Las Palmaseko presondegira, 1939ko abenduan. Hara eramandakoen artean Durangoko alkatea izan zen Teodoro Arregi zegoen.



***Presoak espetxean***

Bigarren Gerra Handiak aurrera egin ahala, eta 1943tik aintzina batik bat, Figueres eta Iruñako kartzeletan Frantziatik ihesean etorritako milaka lagun zeuden. Mugalariek makina bat jende ekarri zuten, desertoreak, piloto aliatuak, judutarrak eta beste. Guardia Zibilak atxilotuta, militarrek Afrikako plazetara eraman ohi zituzten. 1943ko datuen arabera, soilik urte hartan 16.000 pertsona atxilotu zituzten Pirinioak zeharkatzearren.

Batzuk, Urepeleko Jean-Pierre Elissalde kasu, frantziar poliziaren esku uzten zuten berehala. Beste batzuk, berriz, Miarritzeko Pierre Lamaison editorea, Donibane Lohizuneko Raymond Urrutia edo Ustaritzeko Martin Urihassobiscay laboraria bezala, aske geratu ziren, nahiz eta mugalariei Ondarreta, Larrinaga, Miranda de Ebro edo Langraizen zigorrak betearazi zizkieten.

Espainiako Gerra Zibila amaitu baino lehen, milaka soldadu errepublikanok, 1939ko urtarrilaren azken egunetan, erbesterako bidea hartu zuten Katalunian. Horiekin batera, emakume eta ume askok, mugaz bestaldera jo zuten Le Perthusetik, Bourg Madametik eta ohiko pasalekuetatik. Hori dela eta, Frantziako gobernuak, Francorena onetsi zuen egunotan, gerra horren ondorioz suertatu zen erbesteratu uholderik handienari aurre egin behar izan zion. Argelés sur Mer eta Saint Cyprien bezalako Roussilloneko hondartzetan, hesi, itsaso eta soldaduen



***Heriotz-zigor pean zeuden euskal ofizialen argazkia, Burgoseko espetxean.***

artean milaka errefuxiatu kokarazi zituzten, hondarraren gaineko kanpalekuetan.

Horien masifikazio ikaragarriari aurre egiteko asmoz, Espainiako mugetatik gertu hainbat "Harrera Zelai" eraikitzea erabaki zuten agintari frantziarrek. Horrela, Sept Fonds, Le Vernet, Agde, Rivesaltes eta Bram kontzentrazio esparruekin batera, Zuberoatik lau kilometrora zegoen Gursekoa hasi ziren eraikitzen 1939ko martxoaren erdialdean. Azken horrentzat aukeraturiko esparruak Prechacq-Josbaig, Dognen eta Gurseko herri lurretako 80 hektareetan zabaltzen zenak bi muga zituen. Alde batetik, Oloruetik Baionara doan errepidea, bestetik Hôpital Saint Blaisera Prechacqtik doana. Bi bide horiei jarraituz eta laukizuzen luze bat osatuz, hesi ziztadunek, barneratuen eta libreen mundua banatzen zuten. Tartean suertatu zen orube horretan, azkar oso eraiki zituzten 382 barrakoi, errefuxiatuak aterpetzeko eta beste 46 zaintza burutu behar zuten gordetzaileentzat. Hasierako A, B, C eta D barrutietan, esate baterako, euskaldunak kokatu zituzten. Euskaldunentzat esparrua atondu zutenean, 6.555 baziren ere, laster hasi ziren Gursetik kanporatzen, inguruko herrietan eta bereziki, Ipar Euskal Herrian edo Landetan lana edo bizilekua topatu zutelako.



Francok ere izan zituen deportazioak gustuko proiektuen artean. Izan ere, 1961. United Pressera egindako adierazpenetan "bi mioli gorri" zerrendatuak zituela aitortzearekin batera, bere ministro izandako beste batek -Felix Lequerica- garai bateko egitasmoen berri eman zuen jakitera: Bilbo eta Santander indarrez hartu ondoren jendea masiboki deportatzea pentsatu zuten.

*"Ez zen guretzat batere erosoa Espainia askatu berriaren kontrako erretagoardian zorioneko komunitate sutsu hura suntsitu nahi zuen miloietako pertsonen multzoa izatea. Bapatekotasunez, erromes esker-txarreko haiek guztiak Amerika eta Afrikako estatu birjinetara deportatzearekin amets egin genuen bola-*

*da batez, baina ez zen posible. 1848ko ekaitzak eta gero Filipinetara 10.000 matxino deportatu baziren ere, aurrekariak ez zuen balio. Irla maitatu haiek jadanik ez ziren gureak.*

Víctor Uriarte, Barakaldoko gudaria, Upo Mendi itsasontzian egon zen preso, Vigoko badian ainguratuta. Kontatu zuenaren arabera, bertan preso ziren gehienak euskaldunak ziren, Larrinagatik ekarritako 350 euskal preso inguru, hain zuzen ere. Galiziarainoko bidaia ganadurako egokitutako trenbidean egin zuten, urik eta elikagairik gabe, eta kaka eta txiza bagoietan bertan egin behar izan zuten. Itsasontzi hartan ez zuten koltxoirik lo egiteko eta tapakiak ere pribilejio hutsa ziren. Ura razionatuta zegoen, beraz, edateko nahi bazuten, gorputza garbitzerik ez zegoen. Hain zen handia bertan bilduriko jende kopurua, non zeharka egiten zuten lo, elkarren ondoan etzanda, bakoitzak lur gaineko 45 zentimetro inguru besterik ez baitzeuzkan erabilgarri.

1937ko azaroaren 22an, presoz mukuru beteta penintsula zeharkatzen ari zen trenbide bat deskarrilatu zen Alanís de la Sierrako geltokian *(Sevilla)*. Larrinagatik zetorren, ehunka euskal preso Puerto de Santa Mariako penalean uzteko. Istripuaren ondorioz ehun preso inguru hil ziren, erdia bizkaitarrak. Nahiz eta Espainiako trenbidearen historian ezbehar handienetako bat izan



zen, agintari frankistek ezkutatu zuten, eta egun oraindik ia ezezaguna da ikertzaile eta historiagileen artean. Arrasto dokumentalak oso urriak izan ziren, baina senitartekoen egoskorkeriak ahalbidetu zuen pasadizo hura ezagutzea eta dokumentatzea, besteak beste, Sevillako Hospital Probintziala eta Alaníseko erregistro zibileko datuei esker.

Euskal presoen kopuruari dagokionez, oso zifra aldakorrak eta zehazgabeak erabili ziren. Hasierakoek, esate baterako, 40.000 eta 60.000 preso bitartean aipatzen zituzten. 1938ko apirilean Bizkaiko errolda eman zuen jakitera Eusko Jaurlaritzak: 2.800 Larrinagan, 600 Upo



Mendi itsasontzian; 3.000 Deustun; 5.000 Eskolapioetan; 1.500 Karmelon eta beste 2.500 gehiago han hemenka barreiatuak atxilotze egoitza txikietan. Guztira, 15.400 preso Bizkaian bakarrik. 1939. urtearen hasieran, Euzko Deya-k errepikatu zuen 40.000 presoen zifra, baina zehaztapenik eman gabe.

Joanak ziren urte batzuk gerra amaitu zenetik, eta Espainiako Estatistika Nazio Institutuak 1940ko errolda orokorra eman zuen ezagutzera, hamarkada berri baten abiapuntu modura. Eskainitako zifren artean, bazegoen bat arras harrigarria. Preso egotea lanbide gisara zegoen jasoa, gainerako 128 zeregin profesionalekin batera. Preso hartu edota preso egon ez ezik, preso jarduna ere aintzakotzat hartuta zeukaten agintari frankistek. Irizpide xelebre horietatik haratago, aldiz, 8.695 pertsona zeuden Euskal Herriko kartzeletan erroldatuta aipatu hamarkadaren hasieran. Deigarria da Gipuzkoan zegoen emakumezko presoen kopurua, estatu mailakoa baino hiru aldiz handiagoa. Horren zergatia Mutriku aldean zegoen, Bizkaiarekin muga eginez, bertan egokitu zuten-eta Saturrarango espetxea, 1937-1944 urteen bitartean soilik emakumeentzat zabaldu zen kartzela. Zer pentsatua ere ematen zuen beste datu batek: 60 urte baino gehiago zeuzkaten euskal presoen artean, emakumezkoak ziren gehienak.

Baldintzak oso estuak baziren ere, euskal preso politikoek harreman zuzena zeukaten errealitate politikoa-rekin, eta bere barne buletina ateratzen zuten aldiro. Kalean inprimatua, *"Espetxean"* izena zuen eta alboko irudian ikusten denez, presoen aburu politikoak biltzen zituen.

1947an, tropa frankistak Bilbon sartu eta handik hamar urteetara, ehunka ziren oraindik kartzelan geratzen ziren euskal presoak. Gehienak gerran giltzaperatuak. Datu ofizialei erreparatuta,



Espetxean

1942-garreneko Aberri Eguna

! Ezin...¡

¿Ezin? Ona ba emen, ori egia ez dala adieraztera. Ez dakarkizuet gauza berririk. Nik gaur esango dizkizuedanak len ere amaika bider entzunak dituzute, bear bada. Egi zarrak dituzute, noski, emen azalduko zaizkizuenak. Ta alare... emen natorkizue... ta nere apalean arro... ta nere utsean erakuspide izan nairik... „Nai dunak,badezake" ¿Au baño egi zarragorik nai dezute? ¿ Ta zarra izanagatik egia danik nork uka

Arrotzak,etsaiak ere ¿zeri ematen zioten ta diote ,Vasconia edo Pais Vasco izena?. Euskalerria, Vasconia, Pais Vasco orixe dezute ba gure Euzkadi. Zerbait da. Ta zerbait dan bitartean azkatasun itxaropenak argi dezake gure bizia. Zerbait ori ezereztuko balitzaigu ordea. agur gure itxaropena. Mamiari begira dezaiogun, beraz. Kontu ordea mamirik gabeko azalarekin gelditu gabe.Aize boladatxo bat naikoa izango baitegu orduan, azal ori eraman, ta geiago iñork aitatuko eztun izena aztuarazteko Ez gaitezen izen utsarekin lillu-

Elburuari begira

KONTU

saturazioa nagusitzen zen Euskal Herriko presondegietan, Larrinagan 649 preso politiko, Iruñean 280, Ezkaban 940, Gasteizkoan 372 eta Ondarretan beste 458 gatibu baitzeuden. Emakumeentzako kartzeletan zegoen jende kopuruari dagokionez, Bilbon 346 zeuden, Donostian 218, Gasteizen 109 eta 132 Iruñekoan. Kontaketa honetan ez zituzten zenbatzen espainiar estatuko beste espetxe askotan banatuta zeuden euskal presoak. Gerra hain atzean utzita egoteko, preso politikoen kopurua itzeleko marka zen, dudarik gabe.

Sarrera kapitulu honi amaiera emateko, beste datu bat: ihesaldiak. Gutxi izan ziren, nahiz eta batzuek kutsu historikoa ere hartu zuten. Ezkaba mendian dagoen San Cristobal gotorlekutik 795 presok egin zuten hanka 1938ko maiatzaren 22an, sekula egin den ihesaldirik masiboena burutuz. Nolanahi ere, handia izan bazen ihesaren dimentsioa, are tamalgarriagoa izan zen segida izan zuen presoen eihza eta erailtze lana, 211 izan baitziren hurrengo egunetan eraildakoak. Urte askotxo pasata, 1950ko otsailaren 28an lau presok zulatu zuten ireki berria zegoen Martuteneko seguritatea, eta Donostiako kartzela baimenik gabe utzi zuten Ramón Peña Azkue, Alberto Harina Salado, Celestino Uriarte eta Eugenio Urrutia Anduaga gatibuek. Gasteiztik ere bost presok egin zuten ihes 1951. urtean, baina zinu barik harrapatu eta haietako bat, José Iturbe Pujana, tiroz hil zuten.

# Lehen epealdia

1959-1977



*El militar, al no ser político ni poder pertenecer a ningún partido, no tiene posibilidad de ostentar un cargo político*

Jesús González del Yerro,
Ejerzitoko teniente generala espainiar demokraziarekin, eta Espetxe Zuzendaria 1965-1970 urteen bitartean

## **Kartzela ez dugu** *gaur goizeko ihintza*

Bi estatuen kartzeletan euskal preso politikoak egotea aintzinako gertakizuna dugula bistan da. Le pas de Roland haitzarte ezaguna zulatuta agertu zenetik, bederen, ataka gaitza izan da espetxea gure memoria kolektiboan. Bada, ordea, EGI eta ETAren aurkako errepresio zikloari hasiera eman zion garai aipagarria, orduan hasi baitzen Euskal Herriaren alde eta errepresioaren aurka jardungo zuen belaunaldi berri baten kontrako gerra osteko lehen oldarraldi sistematikoa.

Udazkena zen, eta 1959. urtea markatzen ari zen mundu abertzalearen baitako katarsia. Izan ere, Jose Antonio Agirre lehendakaria hiltzear egonda, gorpuztu baitzen urtebete lehenago Ekin-en jaiotzak ahalbidetu zuen borroka fase berri baten hasiera. ETA antolakundea sortua zen 1958. urtean, eta bere ekinbideak kezka larria eragiten zien bai frankismoari, bai EAJri. Bi-biek bazuten zertaz beldurtu, hurrengo mende erdiak erakutsi bezala. ETAren ekinbideak biderkatu zuen agintarien amorrua eta, horrekin batera, atxiloketa andana eman zen. Gehienak Bizkaian egin ziren, Santander, Bilbon eta Gasteizen leherrarazitako bonbak nork jarri zituen argitzeko asmo zuzenarekin. Horren ondorioz, Larrinagako kartzelan preso amaitu zuten urtea hamabost gaztek.

Hamarkada berria hasi zenerako, ETAren izena zein jarduna ezagunak ziren publikoki. Gainera, herri askotan hasi ziren ikusten borrokamolde berrien fruituak, hala nola, pintadak, ikurriñak eta propaganda banaketa. Dinamikaren areagotze honen ondorioz, ETAkoak izateko akusaziopean lehen arrestatzeak eman ziren Donostian, 1960. urteko irailean. Bi arrasatear izan ziren atxilotuak, Juan Jose Etxabe Handixe eta Jon Ozaeta Gautxo, Franco bera hirian zela, ohiko leloak *("Gora ETA" eta "Gora Euskadi Askatua")* margotzeagatik. Martuteneko kartzela ezagutu zuten berehalakoan.

ETAren aurkako errepresioak laino trinkoak ezarri zizkion errejimenak asmaturiko "25 Pake Urte" lelo iraingarriari. Zaharrak berri, espetxeak betetzen hasiak zeuden berriro ere. Nolanahi ere, 1961. urteko udara arte, errepresioaren erpeak ez ziren bete-beterik agertu. Altxamendu faszistaren urteurrena zela-eta, Francoren aldeko gudulari ohiez beteriko tren bat burdinbidetik ateratzen saiatu zen euskal erresistentzia Donostiako Amara auzoko geltokira iristear zegoela. Horrez gainera, espainiar bandera bat ere erre zuten hiriaren erdian, udatiar faxisten muturren aurrean, polizia parregarri utziaz.

Poliziaren erantzuna hordagoaren parekoa izan zen, eta Gipuzkoan zehar batik bat, ehundik gorako atxiloketa egon ziren. Pertsona gehienak, Meliton Manzanas, Eymar koronela eta gisa bereko basapiztien eskutik tortura izugarriak jasan eta gero Madrilera eraman zituzten. Merkantzia trenean eramanda eta libratzeko ere edozein aukera ukatua, Carabancheleko espetxean sartu zituzten hogeita hamaika euskaldun. Horietako zazpik ETAren aurkako lehen Gerra Kontseilua bere larruan ezagutu behar izan zuten.

Urtebete beranduxeago, Donostian bere uda oporrak pasatzeko diktadoreak erabiltzen zuen Aieteko jauregitik gertu, Munto baserrian hain zuzen, bonba bat eztandarazi zuen ETAk. Horren aitzakitan, hamarka lagun eraman zituen poliziak eta asko eta asko bukatu ziren Martutenen eta Larrinagan. Gutxi batzuk salbu, ETAkoak ziren gehienak, baina sarekada berean eramandako beste pertsonen filiazioa komunista eta sozialista zenez, (José Ramon Recalde, Maria Teresa Castells edota Enrique Múgica Herzog tartean zeudela), mito faltsu bat geratu zen Euskal Herriko historiografia xumean, alegia, Francoren aurka borrokatzeagatik, ETAk bezainbeste egin zutela beste antolakundek eta sindikatuk, eta garaiko presondegietan besoz beso eta ia kopuru bertsuetan aritu zirela.

Era berean, langileriaren borrokak eta Bizkaiko zein Gipuzkoako lantegi garrantzitsuenetan antolaturiko grebek asaldatu zuten errejimena. Horrela, 1962. urteko uda hasieran laurogei bat langile zeuden kartzelatuak lanuzteetan parte hartzeagatik. Espetxe barruko elkarbizitzak eragin zuzena izan zuen ETArengan, eta bakarrik akuilu sozialak ziztaturik borrokatzen zuten langile haiek ere nazio askabidearen txertoa jarrita atera ziren beren gogoz kontrako barrualditik.

## **Euskal preso politikoak.** *Izenak izana du.*

Euskal preso politikoen kopurua handitzen zihoan urtetik urtera, eta Euskal Herriko espetxeetan ez ezik, Carabanchel eta Soriakoa ere izan ziren euskal gatibuen ohiko kartzelak. Apurka apurka, ETA zen militante presoak zituen euskal antolakunde ia bakarra. Beraz, arreta berezia bereganatu zuten presoek, hala bere antolakundearen aldetik, nola euskal jendartearen errealitate politikoan. Gaur egun bezala, espainiar legediak ez zuen jasotzen preso politikoaren figura juridikoa. Gaizkileak zirela ozenki aldarrikatzean nazioarteko lejitimitatea bilatzen zuen frankismoak, nahiz eta borborrean zegoen arazo politikoaren dimentsioa izkutuezina zen.

Edonola ere, estatus politikoa lortzearren borrokan murgildu ziren ETAko presoak 1964. urteko abuztuan. Nolabait esateko, Carabanchelen hasi zen protestaldi hura bizimodu duina lortzetik haratago zihoan lehen borrokaldi politikoa izan zela esan liteke. Berrogei urte beranduxeago EPPKk burututakoaren aurrekaria.



***Carabanchelen egindako argazki honetan ikus daitekeenez, PNVk preso bakarra zuen (Joseba Elosegi) 1970an. Gainerako gehinak ETAkoak ziren.***

Estatusaren demandan, bi urrats nagusi eman zituzten presoek: beren eskutitz guztietako erremitean izen abizenei euskal preso politikoa emendailua gehitzea, eta zeukaten espetxe egoera nazioartean salatzea, Vaticano II Kontzilioa bera ere ofentsiba honen baitan sartu zelarik.

Izena eta adjektiboa baterazinak diren arren, justizia kastrense delakoa ezarri zitzaien "*banda armatuko kidea*" izatea leporaturik atxilotu, espetxeratu eta epaitzen zituzten euskaldun guztiei. Horren segidan, izugarri gogortu ziren zigorrak zein kartzela barruko bizi-baldintzak, beraz, euskal preso politikoek buru-belarri erantzun zioten egoerari, makina bat protestaldi eta gose greba burutuz. Presondegiak, halabeharrez, erreibindikazio eta borroka eskola bihurtu ziren. Bereziki gogorrak izan ziren espetxeratze baldintzak ETAk Meliton Manzanas exekutatu eta geroko abagunean.

Bestalde, euskal preso politikoen ugaltzeak beren sakabanaketa izan zuen ondorio. Izan ere, Carabanchel eta Soria txiki geratu zirenean, Burgos, Zamora, Segovia, Ocaña,... guztira hamabost bat presondegitara eraman zituzten, eta Espainiako ordurarteko kartzela sistema hankaz gora jarri zuten, jite politikoa eta militantea egunerokotasunaren azken ertzeraino eraman zuten-eta. Euskararen erabilera izan zen borroka argudio ohikoa, eta senideekin gure hizkuntzan normaltasunez hitz egin ahal izateko administrazioak erakutsi zuen jarrera hertsiari gose grebarekin erantzun zioten. Hortaz, ez zegoen arnasa hartzeko betarik 1970. urtean jada 396 ziren euskal preso politikoen bizimoduan.

Nolako sukarra, halako sendagaia. Presoak dispertsatzen hastearekin batera piztu zen haiekiko herri elkartasuna, eta beraien senideek lehen lerroan kokatu ziren dinamika haietan. Donostiako Artzai Ona izan zen, urte mordoxka beranduago bezala, euskal presoen defentsarako babesleku erreferentziala, lehenengo ekimenetan parrokia-buruak eta poliziak senideak kolpatu eta atxilotzeko elkarlanean jardun bazuten ere.

Eta ziklo historikoak errepikakorrak izaten direla frogatzeko, ETAk, ANVk eta Jagi-Jagik presoen laguntzarako *Ayuda Patriótica Vasca* bultzatu zutenenean, jelkideen mespretxua eta ezaxola jaso zuten trukean. Orduko ukoak ez zuen indarkeria aitzakia egokitzat, baina, hala ere, PNVk beti topatu du geldotasunerako neurriko argudiobidea.

## **Hormak ditu begiak,** *sasiak belarriak*

Euskal preso politikoek dinamika bateratuak eta bizikidetza itzela erdietsi bazuten ere, ez zuten kolektibo politiko bakarra osatzen. Tokian tokiko erreibindikazioen inguruan ardazten ziren protestak



eta espetxe bakoitzeko komunak edo komunek *(antolakunde ezberdinetako kideak zeudenean)* arautzen zuen bizimodua eta erasoei erantzuteko era. 1976. urtean argitara eman zen ***Libro Blanco sobre las cárceles franquistas*** liburuan, doi eta zehatz azpimarratzen zen komunaren balioa:

> *La comuna significa una actividad solidaria cotidiana que une prácticamente a los presos políticos, una escuela en la cual éstos se reparten lo poco o lo mucho que tengan. Este tipo de vida crea lazos muy fuertes entre los presos políticos. (...) Sólo que romper un colectivo de presos políticos es muy difícil, sobre todo si hay conciencia entre los presos de la existencia de tal vínculo unitario. La dictadura no tiene ninguna posibilidad ante esta toma de conciencia por los presos; sólo podría deshacer las comunas llevando a los presos políticos a cárceles en que sólo hubiera uno de ellos.*

Nolanahi ere, komunaren garrantzia ez bada lotzen euskal preso politikoen ohiko bizimoduarekin, ezer gutxi jakingo dugu garai hartako burdinen arteko gora-beherez, kartzelarien jokabidea, egoera politikoa edota diktaduraren beraren zer-nolakoen aldaberatasuna ere puzzle bereko piezak baitira.

Preso erorita, nork bere izaera politikoa izateari ez uzteko hamarnaka baliakizun zegoen. Testigantzak behar-beharrezkoak ditugu giroa ezagutzeko. Irakur dezagun, Carabanchelen bi urte luzaz egon zen Karlos Sanchiz ETAko presoaren iritziz orduan zeukaten *status quo*-aren deskribapena:

> *Odol-deliturik gabe indultatu zuten azken euskal preso politikoa izan nintzen ni, eta Carabanchelen egon nintzen 1976ko udazkenetik 1977ko apirila bitartean. Epe hartan bertoko komunan egoteaz gainera, garaiko giro politikoak ahalbidetutako elkarbizitza ere ezagutu nuen. Izan ere, lau komuna ezberdin zeuden kartzela hartan: mili eta polimiliena (zatiketa emanda bazen ere, harreman kontuetan eta kartzelari aurre egiteko dinamika bakarra generaman), FRAPeko kideena, GRAPOena eta PCEko kideek osatzen zutena. Geure arteko harremanak nahiko errazak ziren, eztabaidak tartean, baina gozoak oro har.*
> *Estatus politiko ofiziala ez zen existitzen, jakina, baina de facto, bai trataera aldetik, bai kontsiderazio aldetik ere, preso politiko gisara ginen tratatuak. Kartzelariek eta espetxe administrazioak bazekiten*

*frankismoaren azken hatsa gertu zegoela, eta desberdinki tratatzen gintuzten nabarmen. Oraingoa baino askozaz politikoagoa zen perzepzioa eta tratamendua. Nolanahi ere, erabateko autogestioa burtzen genuen, eta sukaldea, garbiketa eta abar guk geuk antolatzen genituen. Tratua nahiko lasaia zen, salbuespenak salbuespen. Hainbat kasutan, balizko demokraziaren etorreragatik edo batek daki, eskuzabal eta guzti jokatzen zuten gurekin. Bazegoen Irungo kartzelero bat, ardoa baldeka ematen zigula, bere ustez euskaldunok izaugarri maitatzen baitugu eraria. Garaiko gertaldi hauen alboan, esan beharrik ez dago, Herri oso bat borrokan eta haizea popatik genuen, baina euskal preso politikoak lekuko ez ezik, bultzagileak ere izan ginen.*

Kartzelariei dagokienez, jarrera bortitza eta, oro har, errejimenaren aldekoa zuten, batez ere zaharrek, goardia zibil ohiak izaten ohi baitziren kasu askotan. Janzkera aldetik, uniformea zeramaten, kapela eta guzti, eta bere zereginen artean geroxeago zabaldu ziren praktikak ere bazuten beren gain, esaterako, idatzitako gutunak irakurtzea, bisitetan egindako grabazioak entzutea edota, presoen portaera aintzakotzat hartuz, mailakapenak egin eta graduen arabera sailkatzea.

Gatazka politiko-militarra areagotu ahala,  euskal presoen sakabanaketa eta haien kontrako presio neurriak ere gogortzen joan ziren. 1973ko urrian, berrehun baino gehiago ziren Espainiako kartzeletan banatuta zeudenak, eta hainbat tokitan euskal preso bakarra jarri zuten *(Sevilla, Santander, Gijón, Lleida, Cartagena,...)*. Baldintza horietan, kartzelarien mendeku gosea eta herra nagusitzen ziren, eta mugarik gabeko gehiegikeriak nonhai pairatu behar izan zituzten presoek.

Zigor-ziegen erabilera entzutetsuenetakoa zen, izan ere, argudio txepelak emanez, gutxienez berrogei egunez luzatzen ziren isolamendu epeak ezartzen ziztaizkien-eta; hainbat kasutan sei hilabete ere egon ziren porlana lurrean eta ur-kanila besterik ez zuten zigor eremuetan. Iñaki Egiluz, Basauri eta Segoviako kartzeletan egon zen basauritarrak memorian ditu gordeta txopano likits haietako pasadizo gogoangarriak:

“*Zigor ziegetan koltxoia egunero kentzen ziguten goiza partean, eta iluntzera arte ez ziguten berriro ematen. Normalean berrogei bat egun pasatzeko eramaten gintuzten, eta liburutegiko libururen bat, jaboia, hortzetako eskuila eta pasta ziren gure fardeleria guztia. Papera eta boligrafoa debekatuta zeuden. Zigorra iraun bitartean, garbiketa produktoak besterik ez genituen salgai ekonomatoan. Erretzea ere eragotzita zegoenez, isolamenduzko beste berrogei egun ezartzen zizkiguten zigarreta edota poxpolu bat aurkituz gero. Patioan, bakarka normalean. Ordubeteko paseoan kartzelaria egoten zen, eserita, patioaren erdian, eta beste presorekin bat eginez gero, guztiz debekatuta genuen elkarri hitz egitea.*

Emakume presoak ez ziren asko, eta Alcalá de Henares herriko presondegian egon ziren batera. Lehenago Jone Dorronsoro eta Itziar Aizpurua Segoviako kartzelan egonda ziren, baina 1973erako hamar bat elkartu zituzten Madrilgo gotorleku zahar hartan. *La Galera* izenekoa, XVII. mendeko komentu zena espetxe bihurtu zuten, eta bertako bizi-baldintzak negargarriak ziren. Gerora ere iritisi zen kartzela-usadioaren arrastoan, edozein kobazulotan metatzen ziren emakumezko militanteak, soberakinak edo, faxisten entendimentu molde eskasetan, inon kabitzen

ez ziren *contra naturam* bailiran. Poliziak sarri askotan sartzen ziren beren moduloetan, eta beren burua defendatzeko behin baino gehiagotan gose greba latzak egin behar izan zituzten. Ageri denez, ustezko demokraziaren apaingarri juridiko-legislatiboak indarrean sartu baino lehenago, espetxe politikaren ardatzak ondo finkatuta zeuden Francoren errepresio-orubean, eta aurrekoen basakeria hobetzera etorri ziren arlo penitenziarioko arduradun berriak. Itsuena, ikusi nahi ez duena.

## **Sotana azpian,** *buztana?*

Euskal Herriko historia modernoan ugari izan dira herri erreibindikazioen alboan lerrokatu diren apaizak. ETAren sorreraren haritik eliz-hierarkiatik kanpo kultur lan handia egin zuten herri txikietako apaizak barra-barra zeuden ibilean, bazter guztietan ibili gainera. Eta herri planteamenduarekin bat etorrita, askapen-teologia moduko bat jarri zuten praktikan, zeinaren arabera "*zabalik duzu atea*" esaerak berezko pisua hartu zuen. ETAko militante askok aurkitu zuen babesa abadetxeetan.

Frankismoa, horren ostijale, sututa zebilen fraile haien kontrako ahaleginetan, eta delito ezberdinak leporatuz, hamarka atxilotu eta hamairu kartzelan sartu zituzten 1969. urtez geroztik, Zamorako espetxean giltzaperatuz. Ez dago Europan horrelako parekotasunik izan duen apaiz-mugimendurik; ez eta orduko penal sistemak eman zuen erantzuna bezalako aurrekariarik: "*faltas leves de ligera irrespetuosidad y ofensa a la autoridad*" sasidelitua asmaturik, apaizak kartzelan sartu zituen errejimenak.



***Zamorako kartzelan esoetxeratzen zituzten euskal apaizak***

Euskararen aldeko borroka, torturaren salaketa irmoa, herbestearen bidea hartzera behartuta,... makina bat testigantza utzi zuten abade xumeek Euskal Herriaren aldeko borrokaren orrietan. Hori dela eta, Xabier Amuriza, Luis Maria Bereziartua, Francisco Bilbao, Julen Kaltzada, Jon Etxabe, Alberto Gabikagogeaskoa, Pascual Intxausti, Josu Naberan, Martin Orbe, Mariano Gamo, Felipe Izagirre, Jose Maria Madariaga eta Nikola Telleria euskal abadeak haientzat propio egokitutako Zamorako espetxean izan ziren jasoak.

Min handia eman zien frankistei herriarekin zuten konpromiso sendoak, baina are mingarriago suertatu zen sistemarentzat gainerako euskal preso politikoekin berehala bat egin eta patua ere konpartitu nahi izatea. Julen Kaltzadak hunkiduraz ekartzen ditu gogora bizipen haiek:

> “ *Dena hautsez eta gedarrez beteriko patio txiki bat geneukan Zamoran, tximinia erraldoi baten ondean. Porlanez gogorturiko hartxintxorrezko patio hartan ibiltzen ginen gu paseoan eta pelotaka, jainkoak dakien moduan. Halere, bere puntu ahula zeukan patio hark ere: porlanik gabeko zerrenda bigun bat, patio osoa zeharkatzen zuena eta mirari guztien gune bihurtu zena. Hantxe lurperatzen genuen osaba Joxe, tunela egiten genbiltzanean kanpoko lagunekin komunikatzeko geneukan walki-talkia, irrati txiki bat, kanpotik iristen zitzaizkigun panfletoak... eta hainbat ezkutuko tresna eta misterio.*

Harrigarria bazen ere, Konkordatuzko gartzela hartan ere ihesa burutu nahian ihardun zuten hilabete luzetan. Dena delarik ere, tunela amildu zitzaienean, kartzela osoa deuseztatzea erabaki zuten praileek:

> “ *Koltxoi eta altzariei su eman genien, papera ere ez zen salbatu, eta kristalak, komunak, mahaiak, telebista eta apurtzeko zen guztia birrindu egin genuen, funtzionarioek erreakzionatu zutenerako eta makilaz horniturik erréfuerzoak etorri zirenerako. Zigor gogorrak merezi izan zituen funtziona-rioek eurek El Tornado deitu zioten ekintza bandaliko hark. Gose grebari segituan hasiera ematea erabakita geneukanez, "gainerako preso politikoekin bildu arte ala hil arte", zigorra zigor t'erdi bila-katu zen. Hil arte ez, baina azkenerarte jo genuen.*

Apaizek ausardia handiz egin zuten erreboltaren kronikak ezin argiago islatzen du garai hartan euskal preso politikoek espetxez espetxe zeramaten denboralea: bizi-baldintzak lortu, ihes-bal-dintzak eskuratzeko. Beharbada horregatik ziren hain hotzak PCEko komunakideekin zeuzkaten harremanak. Ihes sen ezberdinak zeuzkaten, eta Espainia mailako alderdi komunistaren irizpideak oso bestelakoak ziren frankismoari azken hatsa zerion koiuntura hartan.

## **Euskal Herria jomugan,** *epaiketa historikoa*

31/69 sumarioak bost mila orrialde inguru zituen, eta espainiar militarrek instruitu zuten. Helburua: hamasei ETAko militante epaitzea eta, bidenabar, gogor zigortzea. Horren gogor, non haietako seiri heriotz zigorra eskatzen baitzien fiskalak. Gaztelako Burgos hirian egin zen haien kontrako epaiketa, eta bere garapenak zein ondorioek mundu osoari buelta eman zioten, diktadurarentzako ondorio ezin larriagoak eraginez.

Ez da gure asmoa Burgoseko epaiketa famatuaren kronika berregitea. Bai, ordea, kartzela barruko 1970. urteko balantze laburraren baitan ETAren baitako krisiak zer ondorio zuzenak zerkarzkion euskal preso politikoen komunari aztertzea. Horrez gainera, heriotz zigorraren mehatxupean egon diren euskal preso politikoen bizipenetara hurbiltzeko saiakera ere badago atal honen xedeen artean.

Edozein kasutan ere, zatiketa haizeak astintzen zuen ETA garai hartan. Seigarren asanblada burutu ondoren, Bostgarren asanbladaren zaleak zein Zelula Gorrien jarraitzaileak, hiru iritzi korronte bateraezin harilkatu ziren erakundearen eztabaidan, eta mataza hura askatu gabe abiatu zen Burgoseko Prozesu ezaguna. Momento hartan, Seigarren asanbladaren erabakiekin lotu baziren ere, aurrerantzean nork bere bideari ekin zioten auzipetuek. Beste espetxeetan sakabanatuta zeudela, Burgoseko penal zaharrera eraman zituzten udazkenean zehar, abenduaren 3an hasi baitzen epaiketa sumarisimoa.



Jokin Gorostidi Tolosan jaio zen 1944an. ETAko kidea izan zen; Eibarren atxilotu *(1969)* eta Burgosko prozesuan bi heriotza-zigor eta 30 urteko kartzela-zigorra ezarri zioten *(1970)*. 1977an, ETAko beste zenbait preso historikorekin batera atzerrira bidali zuten. Hurrengo urteetan, HBko kide eta buruzagi eta Gipuzkoako parlamentario izan zen Eusko Legebiltzarrean *(1980)*. 1981ean Espainiako errege-erreginak Gernikako juntetxera eginiko bidaian izandako gertaeren ondorioz epaitua eta espetxeratua izan zen berriro. 2000 eta 2003 urteetan bi aldiz atxilotuta, 18/98 sumariotzarrean auzipetuta eman zituen bere bizitzaren azken urteak, osasun aldetik nahiko makalduta. Epaiketa amaitzear zegoela, hil zen. Hauexek izan ziren Jokin Gorostidik idatzitako azken hitzak.

*"1970eko urtean Burgosko Prozesuan 31/69 sumarisimoan bi heriotza zigor jaso nituen. 2005eko urtean berriz 18/98auzian. Atzo eta gaur, Espainiako estatu-gerraren estrategiak bahituta. Euskal Herriak hitza eta erabakia behar du, eta hori lortu arte ez gaituzte isilduko. Utzi bakean Euskal Herria! Atzo, gaur eta beti: Gora Euskal Herria askatuta!".*

Bertan egon bitartean, giro onean moldatu ziren, berriz ere kideen artean egotea, epaiketa elkarrekin prestatu ahal izatea eta, besterik gabe, atxilotu zituzten unetik -hiru bat urte, batez beste- isolamenduaren hatzaparretatik batzuk lehen aldiz libratu zirela ospatuz. Antolakundearen norabidearen inguruko nahasmenduak, beraz, ez zuen haien arteko elkarbizitza gaiztotu, beste kartzeletan gertatu bezala.

Eta gainera, egoerak berak, heriotz zigorren eskakizunak, lotura berezia ematen zion taldeari, norberaren zaletasun eta atxikimendu ideolojikoa albo batera utzita. Une hauetan jasaten den atsekabeaz gutxiegi idatzi delakoan gaude. Sufrimenduaren esparrua hain zabala izanda, harrizko pertsonekin identifikatzen dira militanteak, eta oker handia da, guztiari aurre egin ahal izateak ez baitu esan nahi iragaitea erraza denik. Heriotzaren mehatxua buru gainean dilindan edukitzea ez da eramateko erraza, Jokin Gorostidik 1992. urtean kontatzen zuen bezala:

> “*Memento larriena beharbada, abenduaren 30ekoa izan zen. Abokatu guztiak etorri ziren mintzatokira, eta guzti hura tetrikoago bihurtzeko, espetxeko argia joan zen une hartan, eta kandelekin jarri ziguten mintzatokia. Guk ez genekien ezer, eta abokatuak Eusko Gudariak kantatzen hasi ziren... Orduan bai sortu zitzaigula halako korapilo bat barrenean. Nik uste dut ehuneko larogeita hamar batean etsita geundela. Heriotza-zigor bat kendu, baina bestea ezarriko zigutela uste genuen bete-betean.*



***Ezkerretik hasita, Itziar Aizpurua, Mertxe Arregi, Arantza Arruti eta Jone Dorronsoro Burgosen, 1971ean.***

Epaiketa amaitu eta heriotz zigorren baieztapenak eragin bizia eduki zuen, aldi berean, ondoko moduloan zeuden Itziar Aizpurua eta Jone Dorronsororengan, beraien ahaideak exekutatuak izateko zorian baitzeuden. Itziarrek emozio handiz gogoratzen ditu egun haiek:

> *Hiru kideri heriotza bikoizteak irakurketa argia zuen: hirurak, edo bat edo bi, garbitu nahi zituzten. Gure izozgela zantar hartara igo ginenean, komunera jo genuen besarkada bero batekin hiruruok elkarri laguntza eman nahian. Negarrari bidea utzi nion, nahi beste, eta Jokin deitzen nion etengabe, berarengana eraman nintzaten eskatuz. Jone eta biok bete-betean hartu gintuen heriotzaren itzalak, eta Arantza errudun sentitzen zen, bera libre utzi baitzuten eta bere bikoteak ez baitzuen heriotza eskaerarik.*



**1971ean, Burgosko patioan. Ezkerretik eskubira, Bittor Arana, Xabier Larena, Mario Onaindia, Antton Karrera eta Xabier Izko. Makurtuta, Jokin Gorostidi eta Txutxo Abrisketa.**

Giro hartan, sentimenduak horren azal gainean korapilaturik, derrigorrezkoa zen haien artean elkar ondo hartzea. Giza harresi sendoa kontrajartzea ankerkeriari. Egi osoa esateko, bazuten besoz beso aritzeko arrazoi osagarri bat, izan ere, ETAren zuzendaritzak eskura zituen eragingailu guztiak baliatu baitzuen auzipetuen askatasuna lortzeko. Behil kontsula bahitzearekin batera, sator talde bat bidali zuen Burgosera auzipetuak askatzeko zereginarekin.

Hilabete batzuk lehenago espetxe barrutik helarazitako planoak eskuan zituztela, Bizkaitik hurbildu zen taldeak kartzela azpiraino zihoan Burgos hiriko estolda galeria bat topatu zuen. Gogo biziz ekin zioten lanari, eta aste gutxitan burni-sareak moztu eta hormatzarrak bota ondoren kartzelako kalefakzioko galdara-gelaraino iritsi ziren. Botila operazioa izena zuen ihesaldi saiakera portu onera iritsiko zela zirudienean, porlanezko horma indartu batek zapuztu zuen ahalegina. Isolamenduzko moduloaren pare egon arren, kolpeen zaratak eta lanaren emaitza urriak saiakera bertan behera uztera behartu zuten satorren taldea. Amorru bizian itzuli ziren etxera, auzipetuen eta gainontzeko euskal preso politikoen askatasuna ezin eskurago zuten arren. Epaiketa amaitu eta sententziaren zain zeudela, kartzelariek aurkitu zuten lur azpiko tunela, beraz, berehala sakabanatu zituzten kondenatuak. Errejimen faxistak ezin zuen onartu auzi-aulkikoak berriro ere garaile suertatzea.

ETAren baitako posizioen dantzak ere eragin zuzena izan zuen presoen artean. Izan ere, gero eta deslejitimatuago zegoen VI Asanbladaren arduradunek kartzelan zeuden militanteak erabili nahi izan zituzten barne korrelazioa beren alde jartzeko. Makoen errepresioa salatzeko asmo-

arekin, 1971. urtean gose greba bat egitea agindu zien Zuzendaritzak presoei, baina kartzeletatik iritsi zen erantzuna oso bestelakoa izan zen: disziplinagatik egin zuten hainbat tokitan, eta Burgos eta Basauriko presondegietan, esate baterako, bizkarra eman zioten agindutakoari. Mesfidantza nagusitzen ari zen, eta jarreretan zein desbideratze ideolojikoaren arloan oinarritzen ziren zuzendaritzarekiko zalantzak. Euskal Herri osoan bezalaxe, V. Asanbladaren tesiak indartuta gertatu ziren eta, batez ere, militante erreferentzialen jarrera bizkorra eta eredugarriari esker  indar korrelazioa norabidetu zen.

Urtearen amaieran, kartzela barruko egoeraren balantzea plazaratu zuten ETAko presoek, eta espetxe politikaren helburuak salatzearekin batera, errepresio bide horren porrota iragarri zuten irmoki:

> “*Benetazko helburua gure izaera ukatzea da; guk geuk gure kontzientzia eta formazio iraultzaileari uko egin diezaiegun presioa areagotzea, alegia; gure gaitasun fisiko zein psikikoa ahultzea eta, bidenabar, gure erabateko suntsitzea gauzatzea. Labur esanda, modu guztitara indargabetu nahi gaituzte, borrokara itzultzeko tenorea iritsita, geldo eta indarge egon gaitezen, estatu aparatu ustelari kolpatzeko indar guztia galduta. Hau ez da posible. Ez dute, eta ez dute inoiz izango, gu mendean hartzeko bezainbesteko indarra eta kartzela.*




Finean, kartzela barruan pairatzen zuten estutasuna errepresio orokorraren adierazpidea zela ondorioztatzen zutenez, *mako*-etatik estatuaren oinarriak higatzeko borroka etengabeari ekitea lehen mailako erantzukizuna bihurtu zen. Hausnarketa hau mugarri sendoa izan da euskal preso politikoen jardun historikoan, abagune politikoen joan-etorriak lekuko.

Hamarkada aurrera zihoan, eta errepresioaren zartadek behin eta berriro betetzen zituzten komisaldegiak eta, jarraian, kartzelak. 1974. urteko amaieran 245 euskal preso politiko zeuden Espainiako hogeita bi espetxetan. Hurrengo hilabeteetan preso kopurua hirukoiztu zen, eta Franco hil berria zela, 749 lagun ziren kartzelatutakoak. Gehienak ETAkoak edo antolakundeari laguntza emateagatik atxilo hartutakoak. Guztien artean, bakarra zen PSOEkoa eta lau PNVkoak. Borroka antifrankistaren argiak eta ilunak, gezurrak eta mitifikazio interesatua, edoneren eskura daude, errealitateari zintzotasunez hurbilduz gero. Euskal Herriaren askatasuna helburu zuen borrokaren arragoan beti-betikoak egon dira: lehen eta egun, abertzaleak eta sozialistak.

Carabanchel eta Segovia ziren preso gehien biltzen zituzten kartzelak. Kalean zeuden borrokalariekin egiten zuen modu berean, jopuntuan zuen frankismoak kartzelatutako militantzia. Fronte bat gehiago zen, eta euskal gatibuen gose grebak bata bestearen segidan zetozen. Urtebetean bost bat egin zituzten preso askok eta askok, batzuk protestaldia ia azken mugaraino eraman zutelarik. Zaragozako espetxean zeuden hiru euskal preso oso larri eraman zituzten hospitalera. Egarri grebaren ondorioz, Andres Iriondo lasartearra kinka larrian egon zen, hilzorian.

Besteetan, ordea, helburu guztiz politikoa zeukaten gose grebek eta gainerako protestaldiek. Estatus politikoa erreibindikatzeak ezabatzen zuen, errotik gainera, estatuak presoei jarri nahi zien estalki arrunta, eta elkartasunezko herri bulkadari bide ematen zitzaion. Gauzak horrela, 1974. urtearen hondarrean jaio ziren amnistiaren aldeko lehen gestorak, urteak joan urteak etorri, izugarrizko indarra eta atxikimendua hartuko luketeen herri mugimenduaren lehen kimuak, alegia.

## **Ahaleginak ahalegin,** *exekuziorik ez, presoak kalera*

Beren baitara bilduta ez egote hark herritarren elkartasuna biderkatu zuen, eta ETAk berak bultzatuta, barruko eta kanpokoen borrokarako grinak topatu zituen aukera berriak. Adibidez, 1974ko azaroan hasita, 158 presok hilabete batez luzatu zen gose grebari ekin zioten bitartean, Gipuzkoan eta Bizkaian babesa handia jaso zuten bi mobilizazio egunerako deia egin zuen ETAk, eta astebete beranduago berrehun mila langile inguruk lanuzteak egin zituzten euskal preso politikoen aldeko ekimen berri batean.

Hurrengo urtea Jon Paredes *Txiki*, Angel Otaegi eta Joxe Antonio Garmendia *Tupa* kideen kontrako heriotza-zigorrek markatua egon zen. Izan ere, 1975eko apirilaren 27an, Bizkaia eta Gipuzkoa bezperatik salbuespen egoeran zirela, Burgosko Kapitainiako fiskal militarrak zigor-eskaera egin zuen: heriotza zigorra Garmendiarentzat eta Otaegirentzat. Irailaren 19an egin zuten *Txiki*-ren aurkako epaiketa sumarisimoa Bartzelonako Gobernu Militarrean. Sententzia berdina jaso zuen: heriotza-zigorra.

*Tupa*-k eta Otaegik Burgosen itxaron behar izan zuten prozesuaren amaiera arte. Francoren agindua baino ez zen falta. Ostiralero egiten zen Espainiako Ministroen Kontseilua. Eta abuztuaren 28tik ostiralero, Francok noiz agindua emango zeuden biak Burgosko espetxean. Angel bakarrik, zeren eta heriotzera zigortu zutenean ziega aparte batean jarri baitzuten azkenengo hilabetean. Eta patioan ere ez zioten uzten besteekin ibiltzen.

Burgosko espetxeko *Patio de las Acacias* malapartatuan jendea exekutatu zuten Espainiako




***Burgoseko espetxean fusilatu zuten Anjel Otaegi***

Gerra Zibilean. Bertantxe eman zituen azken egunak Angelek; han ibili zen azkenengoz paseoan, eta han erakutsi zituen azkenengo kezkak, azkenengo beldurrak, Soraluzeko Bizente Gurrutxagak eta Jose Mari Zubillaga hernaniarrak bere kideek gogoratzen zutenez:

Angelek bukaera-bukaera arte ez zuen sinetsi hil egingo zutela. Fiskalak apirilaren 27an heriotza zigorra eskatu zuenetik, bazekien bere bizitza kolokan zegoela. Kanpoko mobilizazioen berri ere bazuen. Eta kanpoko mobilizazioetan sinesten zuen. Behin hilko zutela esan ziotenean -dio Gurrutxagak- mobilizazio handiak hasi ziren Euskal Herrian eta Euskal Herritik kanpo. Eta Angelek itxaropena bazuen; batik bat nazioarteko mobilizazioetan sinesten zuen. Askotan hitz egin genuen gai horretaz, bere egoeraz, eta oso bukaera arte ez nuen zapuztuta ikusi. Ez zuelako uste hilko zutela.

Isolatuta eduki zuten irailaren 27an, goizeko zortzietan, fusilatu zuten arte. Lekukorik gabe hil bazuten ere, kartzelariek kontatu zuten espetxeko atzealdean zegoen baratzean erail egin zutela. Garmendia ez zuten hil, azken unean Francok indultatu zuen-eta.

Bartzelonako Modelo espetxean eman zituen *Txiki*k bere azken orduak. Mikel anaia eta bere abokatuekin batera, hamabi orduz jardun zuten heriotzaren zain. Goizeko zortzi eta erdietan, Guardia Zibileko sei kidek, fusilean bina bala zituztela, pixkana-pixkana tiro egin zioten Cerdanyolan, exekuzioak zemaien plazeraz gozatu ahal izateko eta biktimari hilzoriko herioa luzarazteko. *Eusko gudariak* kantatuz hil zen *Txiki*.

Alabaina, ez zen gobernu espainolaren asmoa *Txiki* eta Otaegi fusilatze pelotoi baten aurrean hiltzea, garrote bidez baizik. Hala eta guztiz ere, Estatu osoan guztira ez baitziren izango bost baino gehiago garrotean trebaturiko borreroak, eta, horregatik, ezinezkoa zen aldi berean bost exekuzio izatea. Hortaz, bada, Francoren egoskorkeria gaiztoa izan zen garroteaz baliatu ordez fusilatzeaz baliatzera behartu zituena, aldi berean bost pertsona hiltzea neurri eredugarritzat baitzeukan hark.

Heriotzera kondenaturiko hiru militanteen bizitza salbatzearren hamaika ahalegin eta bi gehiago egin ziren, han-hemenka, kartzela guztietan. Ordurarteko gose grebarik gogorrena egin zuten euskal preso politiko ia guztiek. Itziar Aizpuruak, hunkidurak hartuta, oso present ditu egun mingots haiek:

*Estatu guztian geunden euskal preso politiko guztiok edo ia guztiok, behinik behin, heldu genion ekimenari, gure protesta epaiketen aurkakoa zela adieraziz eta zigor haiek bertan behera uzteko eskatuz. Ordura arte kartzela barruan egindako gose-greba eta protestaldirik handiena izan zen.*

Azal bizian agertu ziren morroilopeko kideen ezinbesteko elkartasun taupadak. Dena dela, ziegaz ziega barreiatu zen sentimenduen ehundurak garbi asko islatzen zuen une horietan, begiak zabal-zabalik, gaubeilan emandako orduek utzi zuten min sakona:

*Gu orduan, bakoitza bere ziegan, ezdeusak ginela sentitu genuen, eta pentsatu, euskal gudari horien emankortasun handia eredu izango genuela guztiok, aukeratu genuen bidea jorratzen lagunduko zigula, eta egunen batean lortuko genuela Euskal Herri independiente eta sozialista. Ezin barka, baina, gau luze, luzeegi hartan laguntzea izan eta lagundu ez zienei.*

## **Xoriñoak kaiolan...,** *ezin egon*

Euskal preso politikoak, kosta ahala kosta, beti ahalegindu dira betetzen agindu zaharra: presoen betekizun nagusia, espetxetik hanka egitea da. Eta hainbatetan lortu ere lortu zuten.



***Basauriko iheslariak PArisen egin zuten agerpenean.***

Larrinagakoa ordezkatzeko presondegi berria eraiki zuten Basaurin, eta ETAko militanteak izan ziren bertan lehenengo apopiloak. 1967 urtean irekita, bi urte besterik ez ziren igaro harik eta bertatik lehen ihesaldi handia egin zen arte. Hamar euskal preso politiko irten ziren, 1969ko abenduaren 11an, barrutik egindako tunel batetik, espetxeaz kanpoko komando baten ezinbesteko laguntzarekin. Hilabete bat beranduxeago, Parisen egin zuten agerpen publikoa, frankismoa salatu eta espetxean utzitako beren kideekiko elkartasun haizea astintzeko.

Aurrekaria gogoan, saiakera ugari egin ziren hurrengo urteetan ere, baina beste zazpi urte pasatu behar izan ziren beste ihesaldi masibo bat gauzatzeko. Segoviako kartzelatik, hain zuzen ere.

976ko apirilaren 5ean hogeita bederatzi preso politikok, horietako hogeitabost ETAkideak zirela, ospa egin zuten Segoviako kartzelatik, estolderia baliatuta. Lan mardula egin behar izan zuten, urtebete lehenago Lejarza *El Lobo* salatariak egindako isilmandatuak zapuztu baitzuen beste saiakuntza bat. Tunel bat zulatuz izan zen, eta zulaketa lanek sei hilabete iraun zuten. Saiakera honetan parte hartzeko gonbidatu batzuek ez zuten eskaintza onartu, Lucio Lobatok, PCEko buru, edo VI. asanbladako ETAko kideek kasu.

> *"Hanka egitea Euskal Herriarekin geneukan konpromisoetako bat zen" zioten ihes egindakoek. Izan ere, militante politiko gisa euskal presoek beren gain hartuta, zeregin garrantzitsutzat jotzen zuten ihesaldia, are gehiago koiuntura hartan, non amnistia eta amnistiaren aldeko herri mugimenduaren sustapena helburuen inguruan indar metaketa handia ematen ari zen.*

Behin ihes eginda, kamioi batean gorde eta Nafarroa aldera joan ziren. Iheslariak Aurizberri-raino joan eta bertatik saiatu ziren muga zeharkatzen Urepel aldetik. Baina Guardia Zibilarekin egin zuten topo. Orduan taldeetan banatu ziren. Zakurrek Kataluniako preso bat hil zuten, Oriol Solé Sugranyes, 28 urte besterik ez zituela. MIL (Movimiento Ibérico de Liberacion) erakunde anarkistako sortzaileetako bat izan zen. Beste bi iheslari balaz zaurituta suertatu ziren, Mikel Unanue eta Manuel Isasa, azken hau, dum-dum bala batek jota, oso larriki.





**Ezkerrean, Oriol Solé Sugranyes, goardia zibilak Auritzen hildako iheslaria. Goian, Segoviako estolderiaren irteerta.**

Iheslari gehienak eta ihesa laguntzen ibili ziren komandokoak atxilotu egin zituzten hurrengo goi-zalban. Lau presok, Koldo Aizpurua, Mikel Laskurain, Jesús Mari Muñoa eta Carlos García Soler katalana, kamioiko gidariak eta komandoko kide batek baino ez zuten lortu ihesa burutzea. Miren Amilibia taldekideak oso garbi zuen ihesaldiaren azken xedea, kideak askatzearekin

batera, amnistiaren aldeko borrokari arnasa ematea zela, eta holaxe ekartzen zuen gogora egin zioten elkarrizketa batean:

> *Franco diktadorea ohean hil eta hilabete eskasetara, oraindik gauzek berean jarraitzen zuten. Beraz, gureztat funtsezkoa zen sistema pitzagarria zela erakustea, batik bat kartzela bezalako lanabesa haiei ahalik eta kalte gehiena eginez. Bertan zegoen jendea ateratzeak egundoko balio politikoa zuen.*

## **Kartzela utzi,** *gatazkak badirau*

Diktadore odoltzalea desagertuta, denbora kontua zen kartzelatik ateratzea, baina euskal presoen gogoa eta egitasmoak askozaz haratago zihoazen, kartzelara eraman zituzten arrazoi politikoak konpondu ez eta Euskal Herriarentzako marko demokratiko bat eskuratu gabe, alferrikakoa izango bailitzateke edozein kaleratze.

Funtsean Estatu espainolak bere mugetan preso dituen nazioek eskatzen zuten botere politiko propioa edo autonomia eskariak asetuko dituen barne aldaketak bideratu ziren. Egoera honi aurre egiteko, Estatu espainoleko klase politiko gidaria, betiere Estatuko botere errealeen gidaritzapean eta PNVren laguntza osoarekin, adostasun batera iritsi zen, estatuko egitura modura monarkia berreskuratzea oinarri zuena. Demokrazia parlamentarioa eta merkatuko ekonomia funtsezko beste osagarriak izanik, Euskal Herriari begira, *Autonomien Estatu* delakoan kokatzen zen aldaketa politikoa. Deszentralizazio administratibo soila zekarren errejimen bat, hain zuzen ere.

Garapen politiko harekin batera, orduko indar politiko espainolak, erregimen frankistatik sortutako beste arazo bati irtenbidea eman beharrean aurkitu ziren: borrokan parte hartzeagatik milaka preso eta iheslari politiko zeuden. Egoera berriari itxura demokratikoa emateak errejimen frankistaren aurkako militantziaren ondorioz espetxeratuen askatasuna edo itzulera eskatzen zuen. Amnistia zen aldarrikapen nagusia eta ugariak ziren haren aldeko mobilizazioak Euskal Herrian. Gestorek deituriko amnistiaren aldeko azken asteetan, herritarrek pairatu zuten errepresioaren intentsitatea sekula ezagutu gabekoa izan zen, eta polizien balen pean hildako asko izan ziren. Samin handiz ikusten ziren gertakizun hauek kartzela barrutik, nahiz eta ordurako hamarka batzuk besterik ez ziren. Viena, Oslo, Brusela eta Copenaghe izan ziren entzutetsuenentzako destinuak; beste batzuek, alta, oraindik hilabeteak itxaron behar izan zuten.

Testuinguru hartan, 1977ko urriaren 17an Amnistiaren Legea onartu zen Espainiako gorteetan. Lege horrek, 1976ko abenduaren 15a baino lehen arrazoi politikoek eraginda egindako delitu denei eragiten zien. Halaber, 1976ko abenduaren 15etik 1977ko ekainaren 15era bitartekoak



***Fran Aldanondo, 1977ko indultoak kaleratu zuen azken euskal preso politikoa. Argazkian, Martuteneko espetxetik irtetzean.***

ere bere baitan jaso zituen, "baldin eta askatasun publikoen aldeko arrazoiek eragindako delituak izan badira"; eta 1977ko urriaren 6tik aurrerakoei, "pertsonen bizitzaren edota osotasunaren aurkako erasorik gertatu ez bada".

Poliki poliki espetxeak hustutzen eta iheslariak etxeratzen hasiak zeuden. Zigor gogorrenak zeuzkaten azken euskal preso politikoen arrozkuntzarekin, eta Askatasunaren Ibilaldian berauen aberriratzearekin bukatu zen indultoaren atzera-aurrera. Labur esanda, agintari espainolek kaleratzeak barkamenaren bidez gauzatu zituzten, beren neurriko eskuzabaltasuna erabiliz, baina hartutako erabakiak ez ziren benetako amnistia bat bezala hartu. Izan ere, horrela egiteak kartzeleratutakoen borrokaren zilegitasuna onartzea zitekeen, eta benetazko irtenbide poilitikoak hartu beharra ere bai. Aitzitik, errepresio frankistaren ondorio batzuk samurtu ziren, baina muinean zegoen gatazka politikoaren benetako arrazoia, ez zen eztabaidatu ere egin. Bere horretan geratu zen.

Lege horren ezartzean, espetxean zeuden euskal preso guztiak atera ziren. 1977ko abenduaren 9an irten zen Martutenetik Fran Aldanondo, espetxean geratzen zen frankismo garaiko azken euskal preso politikoa. Baina euskal gatazkak aurrera jarraitu zuen. Askorekin gertatu bezala, Aldanondo bera erail baitzuen poliziak bi urte beranduago Tolosako Izaskun auzoan.

# Bigarren epealdia

## 1978-1983



*... sé construir cárceles para fieras, y lo haré si me obligan a ello...*

Carlos García Valdés,
Director General de Instituciones Penitenciarias (1979)

## **Ziklo berrian,** *orbela bihotzetan*

1975 eta 1979. urteen bitartean bi indulto mugatu eman ziren. Dena dela, preso politiko guztiak ez zituzten kaleratu (Grapoko batzuk kartzelan utzi zituzten), eta preso sozialei zigorra murriztu bazitzaien ere, barkamen orokorrik ez zuten merezi.

Erreforma politikoaren erraietan Euskal Herria ukatzen jarraitzeko plangintza ondo diseinatuta zegoen, eta diktadorearen ondorengoek bere horretan utzi zuten gerrari segida emango liokeen eszenatokia. Euskal Herriari begira, *Autonomien Estatu* delakoan kokatzen zen aldaketa politikoa. Deszentralizazio administratibo soila zekarren errejimen bat, hain zuzen ere. Eskema honetan PNV sartu zen buru-belarri, eta gure Herriari egingo zion iruzurraren oinarriak hasi ziren finkatzen. Gatazkak aurrera jarraitu zuen, PNV etsaiarekin lerrokatuta eta errepresioarekin bat eginda.

Lege antiterrorista gogortu zuten hurrengo hilabeteetan, eta salbuespenezko araudia normaltasun osoz ezarri zitzaion borrokan ziharduen euskal jendeari. Kartzeleetako erreforma zuzentzeko, Carlos García Valdés izendatu zuten, barne eta justizia ministroak UCDko Rodolfo Martín Villa eta Landelino Lavilla, hurrenez hurren, zirelarik. Falangistak eta neofrankistak ibili ziren, besoz beso, kutsu demokratikoan hezitako arduradun berriekin elkarlanean, errepresio formula eragin-korren bilatze lanean.

Atxiloketak etengabe egiten ziren abagune hartan. 1978ko urtarrilan Orereteko Jose Manuel Iribar eta Sabino Arzelus, eta Iruñean atxilotutako Xabier Elkarte, Fermin Anzizar, Juan Mari Olano eta Maximo Aierbe izan ziren, besteak beste, sasidemokraziapean Espainiako kartzele-tara itzuli ziren lehen euskal herritarrak. Sarekada berean bi ETAkide erail zituen poliziak, Xefe Sarasola eta Jokin Perez Viñaspre, eta inspektore bat ere hilik gertatu zen. Ordu batzuk beran-duago, Martin Villa ministroak egunkaria-orrietan titular handitan jaso zen esaldia esan zuen: "Bi eta bat gure alde". Horrelakoak ziren jokabide demokratikoak kartzelak hustu eta berehala. Frantziar polizia eta epaitegien esku, bestalde, Xan Marguirault preso zegoen 1977. urtea amaitu aurretik, Baionan, auto lapurtu batean molotov koktelak atzeman zizkiotelako. Bidasoaren bi aldeetan kartzelak betetzen hasi ziren, kartzelariei uniformea ozta-ozta aldatzen utzi eta aro be-rriaren zertzelada nagusiak zeintzuk ziren berresteko denbora urria izan eta gero.

Urtea amaitu baino lehenago, ehunda berrogeita hamarretik gora euskal preso politiko zeuden espetxeratuak Espainiako kartzeleetan. Urte bereko udazkenean, Espetxeetako Zuzendari nagusia zen Carlos García Valdés-ek prentsa eta gutunen zentsura ezarri zien euskal preso politikoei, eta zigor-ziegek berreskuratu zituen, bete-betean gainera, beren soslai *bergizarteratzailea* euskal disidentziaren kontrako zereginetan.

Zeuzkan ardurak utzi aurretik, Espetxe Lege berria idatzi eta legebiltzarretara eraman zuen García Valdés-ek. Grapo garbitzen saiatu zen, bere aurretikoa izan zen Jesús Haddadekin egin zuten bezala, eta heriotzaren sega horren gertutik ikusi ostean, irakasletza hartu zuen lanbide, eredugarritzat eman zen espetxe erreformaren testua legatu gisa utziz. Eskubide formal ugari jaso zituen erreforma hark laster utzi zuen ageri testuaren eta ezartzearen arteko distantzia itzela. Izan ere, irteera-baimenak, baldintzapeko askatasunaren arautzea edota zaintza-epaileen sorkuntza lorpen garrantzitsuak izanik, isolamendua, deserrotzea eta tortura bihurtu ziren lege ondorengo hilabeteetan. Azken finean, eskubideen kudeaketa frankismoan hezitako kartzelarien esku zegoen, eta kartzela barruko sarraskiak nonahi gauzatu ziren demokrazia berriaren itzalean.

Lege berriaren 10. artikuluak isolamendu errejimena berplanteatu zuen, zigor eta mendekua hitzak aipatu gabe, baina presoak zapaltzeko tresneria trinkoa finkatuz. Horrenbestez, kontrola eta muturreko behaketa direla medio presoen bizimoduak endekapen mugagabea pairatu zuen. Bergizarteratzea aldarrikatzen zen irrika berberarekin ukatzen ziren oinarrizko eskubideak.

Preso politikoak ez zeuden, noski. García Valdések berak zioen "demokrazia garaian ez direla existitzen", eta status politikoa ukatzearekin batera, salbuespenezko egoerak eta trataerak jaso ziren arautegi ofizialetan. Beraz, handik aurrera *de facto* irmotu zen iruzurrezko jokabideari lehen harria jarri zitzaion lotsagabeki, eta euskal preso politikoak izan ziren kaltetuenetakoak. Legea ez zen berdina guztientzako, eta amarru juridikoek sorturiko babes falta nabarmendu zen hurrengo hilabeteetan.

Indulto ondorengo lehen euskal preso politikoak Martutene, Iruñea eta Basauriko kartzeletan zeuzkaten giltzapeturik, harik eta, San Fermingo jaiak lehertu eta German Rodríguez tiroz hil eta gero, agintariek Iruñeako espetxetik atera eta bost kide Burgoseraino eraman zituzten arte. Bertan, isolamendu gordinean izan zituzten, bakarturik eta baldintza kaskarretan. Orduarako, 1978ko udan, honako hau zen euskal preso politikoen kopurua eta tokian tokiko banaketa: Basaurin, 32; Martutenen, 46; Langraizen, 13; Burgosen 5 eta Iruñean, 6 kide.

Carabanchelen ere bazeuden euskal presoak, epaitu aurreko egonaldi laburra izaten zuten-eta. Ekainean, tunel bana topatu zuten espetxe funtzionarioek, bat Madrilen eta bestea Iruñean. Irakidura politikoak lagunduta, ohi bezain lerromakurra zuten itxitokia, baina ukigabe animoa zein jardunbidea. Izan ere, Euskal Herrian nabarmentzen zen markoaren aurkako giroak elikatzen baitzuen barrukoen grina. Garai hartakoa da, nonbait, euskal preso politikoen Kolektiboaren sortze garaia. Dena konpartitzeko giza premiatik haratago, kohesio politikoa helburu nagusi zuen urrats politiko sakona izan zen Kolektiboa gisa lehen aldiz definitzea eta, are premia handiagokoa, eragotea. Gatibutasunari era antolatuan aurre egin eta, politikoki, diktadurerekin hauste prozesua indartzea ziren urrats berriaren ardatzak. Eta erresistentzia zehar gakoa.

Martin Villa ere iritzi berekoa zen, nahiz eta falangista ohiak bere modura onartzen zuen:

*"ETAren nortasunak, Estatu interesak tartean daudela, etengabeko errepresioa exijitzen du; berariazko errepresioa espetxe barruan zein kanpoan, alegia"*. Berariazko errepresioari erantzuteko eta, era berean, koiuntura politikoa eragiteko asmoarekin, kartzela ezberdinetan zeuden hogei euskal preso politikok gose greba egin zuten 1978ko irailaren 25etik aurrera.

Garai berriko lehen protestaldi luze eta antolatu honetan, bi ziren helburuak: amnistia osoa eta lege antiterroristaren deuseztapena exijitzea. Hogeita hamahiru egunez luzatu zen gose greba. EPPK zer den definitzeko Kolektiboaren kideok 2003. urtean jakitera eman genuen zehazketari jarraiki, Euskal Preso Politikoen Kolektiboa borrokaldi haren testuinguruan eratu zela esan genezake:

> *Kartzela barruan geure burua antolatu eta nazio askapen prozesuari ekarpena egiten jarraitzeko lanabesa besterik ez da Kolektiboa.*

*Basapiztientzat* propio eraikitako espetxeetan ere euskal presoak garaile ziren berriz ere. Dena dela, borreroak bezala, hamaika aurpegi eta aldaera ditu espetxe politikak.

## **Duero ibai ertzeko** *laborategia*

Jose Migel Ordeñana Argala erail eta astebetera, ustekabean ireki zituzten Burgos, Langraiz, Basauri, Iruñea eta Martuteneko ziegetako ateak, eta puskak biltzeko aukera handirik gabe taldeka sartu zituzten traslado-furgoietan, Soria helmuga zuen lekualdatze masibo batean. Guztira, 97 izan ziren hara eramandako euskal presoak, eta Burgosen zegoen Maximo Aierbe ataundarra biziki ondo akordatzen da derrigorrezko bidai harekin:

> *Oso bidai laburra izan bazen ere, Soriara eramateak zeukan esanahi politikoaz akordatzen naiz batik bat, zeren UCDk hartzen zuen deliberamenduak ez zion zirrikiturik uzten orduraarteko itxaropenari, alegia, oso epe laburrean hausturaren bidetik aurrera egin eta Euskal Herriarentzako marko demokratiko bat lortzekoa. Gerraren aldeko apustu garbi baten zantzuak baino ez ziren haiek, eta gogoeta horrekin egin genuen lekualdatzea.*

Bere baitan hiru herrialde bakarrik bilduko zituen Estatutua negoziatzeko bilera mamitsuak egiten ari ziren abagune hartan, gogor eta zakar hartu zuten alderdi autonomistek ia ehun preso haien lekualdatzea. Nolabait esateko, Konstituzioari ezetz borobila eman ondoren, independentziaren aldeko alderdi eta eragile sozialak marko zatikatzaile eta antzuaren joku-eremura erakartzeko esperantza zutelarik, ur-txarro hotza zen halako erabakia Madrilen hartu eta adostasunik gabe Euskal Herriari inposatzea. Bere sinesgarritasuna kinka larrian sentiturik, protesta formal luzatu zitzaion ministroari Euskal Kontseilu Orokorreko (CGV) idazkaritzatik: "Beste behin ere, Euskadiko

normalizazioa larriki kaltzetzen dituzten erabakiak hartu dira botere zentraleetatik; eta hartu dira gure komunitateko gobernu organoak kontsultatu edota aldez aurretik jakinarazi gabe".

Nolanahi ere, UCDko gobernuak apostu gogorra egin zuen Soriako kartzelarekin, eta elkar-aditze saiakerak besteetarako utziko zituzten. Orduko xede bakarra zen EPPKren indarra akitu eta zeukan erreferentzialtasun politiko erraldoia biolentziaren bidez indargabetzea. Horratik, prentsa-ohar labur batek azaldu zituen gobernuaren arrazoiak: "*razones de seguridad han aconsejado acordar el traslado de los presos a la prisión provincial de Soria, que reúne condiciones de seguridad y habitabilidad. La vigencia y custodia de ésta prisión, tanto interior como exterior, estará a cargo en exclusiva de los cuerpos y fuerzas de la Seguridad del Estado*".

Azalpen hauen gibeletik, arrazoi politiko zehatzak zeuden, jakina. Hasteko eta behin, UCDko gobernuak moztu nahi zuen Euskal Herria eta euskal preso politikoak lotzen zituen zilbor-hestea, euskal lurraldeetan preso egonik egundoko eragina baitzuten presoek bere inguru politiko eta sozialarengan. Era berean, presoen errealitatea izkutatzeko distantzia baino harresi altuagorik ez dago, bai fisikoki, bai psikolojikoki. Eta azkenik, preso sozialen artean gori-gorian zegoen borroka planteamenduaren kontrako txerto gisara ere, espetxe sistemari aurre egiteko euskal preso politikoen erreferentzia sendoak elur-bolaren efektua ekar zezakeelako. Nolanahi ere, errepresio paradigma berria eraikitzen hasia zegoen.



***Soriako kartzelako sarrera nagusia. Euskal preso politikoentzako* Terminus Ostatua: *erresistentzia politikoa zapaltzeko presondegia.***

Euskal presoak eraman aurretik, Sorian zeuden Grapo-ko hogeita hamabi kideak Zamorara eraman zituzten. Preso iraultzaileentzako neurriko presondegietan kaiolatu nahi zituztela bistan dago, Alemanian RAF-eko kideekin egin zuten eran. Izan ere, Stammheim-eko kartzelan gatibu zeuden ezker muturreko antolakundeetako eta, oro har, alternatiba antikapitalistaren militanteak ez ezik, ezkerreko mugimendu osoa ere deuseztatu nahi zuen espetxe-errepresio estrategia zorrotz baten diseinuak.

Dena delarik ere, ezaugarri bereziak zituen zapaltze eredu hartan osagai militarrak berbiziko pisua zuen, orduko botere faktikoen arteko indar korrelazioaren irudiko edo. Esan nahi dugu, guztiz ezohikoa dela kartzela baten barruan poliziak, uniforme, arma eta guzti, kartzelarien lekua eta zereginak bere gain hartzea, eta Espainiako errepresioaren historio modernoan ez dugu harekin parekotasunik duen egoerarik aurkituko. Kolektiboa suntsitzeko deliberamendu osoa zuen orduko gobernuak, antolakunde armatuen aldetik inoiz ez bezalako presio izugarria pairatzen zuen garaian, hain justu ere.

Euskal Herriko kartzeleetatik egindako lehen trasladoak segida izan zuen berehala, eta Carabanchelen zeudenak ere Soriara eraman zituzten hurrengo egunetan. Pieza guztiak xake-taulak zeuden: alde batean EPPK, eta beste puntan, kale-istiluetan zaildutako Polizia Nazionaleko konpainia oso bat. Aurrez aurre jarrita, talka ezinebestekoa zen.

Soriako espetxeak bi pisutan zeuzkan bananduta sei galeriak. Bi patio zeuden eta, galeria sareko epizentroan, kontrol garita bat zegoen. Arkitekturari esker, garai hartako ETAko bi adarretako kideak (miliak eta polimiliak) nor bere espetxe-eremu propioan zeuden, beren arteko harremanak okerretik okerrera baitzihoazen. Autonomoak, milien patioan eta jardun-lerroan aritzen ziren. Kalean ematen ziren ika-mikak eta arazo politikoak emendatu baino ez ziren egiten itzalpeko topaleku hartan. Pasadizo ahaztuezinak dakarzkigu akordura Maximo Aierbek:

> “*Bi antolakundeetako kideen arteko harremanak txarrak ziren oro har, nahiz eta polimili batzuekin aski ondo moldatzen ginen. Besteekin, ordean, azalarazi egiten ziren ezinikusiak, eta noizbait eskuetara ere iritsi ginen kartzelako kantinaren aurrean, baten bateko baso bat puskatu zion buruan haietako bati, eta egundoko iskanbila gertatu zen. Traizioaren eta, okerrena zen, hipokresiaren lurrina jasangaitza genuen-eta.*

Barne sakabanaketa hura zela medio, errepresioaren mailakatzea aunitz bereizgarria zen, izan ere, milien kontrako oldarraldiak izaten ziren usuenak, eta poliziak ere pasillo itxi eta burdin hesi iragazkaitzak baliatzen zituen bere razziak burutzeko. Kontrol goreneko barne-egitura zen Soriakoa. Edozein modutan ere, Kolektiboaren eraketa eta antolakuntza ere goi mailakoak ziren, eta eskura zeuden bitartekoak aprobetxatzen ziren espazioa irabazi eta izaera kolektiboa azpimarratzeko. Besteak beste, sukaldea, eskola eta garbiketa zereginetan autonomia erabatekoa zeukaten presoek, hain handia non jakiak erosteko zegoen kontusaila dirutan ematen zion espetxeko administratzaileak sukaldeko arduradunari. Aurrekontu harekin eta senideek sartzen

zituzten janaria-paketekin antolatzen zen eguneko *menu*-a. Beste kartzeletan zeukaten *piri*-a (espetxeko arrantxoa, argotean) eta euskal preso politikoek zausta-zausta jaten zutela oso ezberdinak zirela esan beharrik ez dago, baina zeukaten pribilegio bakarra barne-indarra zen, beren izaera kolektiboa errespetarazteko tinkotasuna.

Eguneroko bizitza, ordea, zaila zen. Hara iritsi eta berehala, presoen abokatuek eta senitartekoek eman zuten jakitera jasaten zuten errejimenaren nondik norakoa. Patiora bi ordu eguneko ateratzen zituzten, taldeka, eta polizien jokabidea arrunt probokatzailea zen. Bisitak grabatuak izan arren, lokutorioetatik irtetzean miatzen zituzten presoak, liskarren bila etengabean. Zipoka eta zirika, egoera militarizatu hartan behin eta berriro tupust egiten zuten zakurrekin, urte batzuk geroxeago preso ohi batek kontatzen zuen bezala:

> “ *Ziegatik atera bezain pronto, zure ohetik lau pausutara, polizia bat zegoen betiere. Bere alboan pasatzean, eskura zeukaten guztiaz jotzen gintuzten; borraz, metrailetaz, edota irainka hasten ziren,...*

Poliziaren komandante baten agindupean eta lepoan zapi gorria zeramaten ehunda berrogeita hamar morroi inguru ziren, jaun eta jabe, presondegiko agintza bakarra. Zuzendaria txotxongilo hutsa zen, eta kartzelariek poliziei beheko ateak irekitzea zuten eginkizun soila. Beraz, armen legea zegoen indarrean, zakur bakoitzak pistola, porra elektriko luzea eta spray negar-eragile bana baitzeraman gerrian. Ez zen denbora asko pasatu behar izan tentsioa areagotu eta lehertzeko. Euskaldunen kontrako margotzeak edota xuxurla mehatxugarrietatik, lehen eraso fisikoetara eman zuten jauzia eta euskal preso politikoek planto egin zuten. Gose greba izan zen lehen erantzunetako bat, eta inkomunikazioa ordainarazitako zigorra.

Egoera labainkorra zen oso, eta kalean ere antzekoa. Izan ere, indultoak gatazkaren oinarrian zeuden arazoei erantzuten ez ziela pentsatzeagatik eta askatasun demokratikoak zein iheslarien itzulera betegabeko exijentziak zirela uste osoa izanda, Amnistiaren aldeko Batzordeek bere lanarekin jarraitzea erabaki zuten, kide fundatzaile batzuek batzordeak disolbatzea nahiago bazuten ere. KAS alternatibaren inguruan metatzen ari ziren indar bilketaren ondorioa izanik, ETA pm-eko presoek publikoki salatu zuten Batzordeen erabakia, bere jarduna sektariotzat hartuta. 1979ko urtarrilean, laurogei euskal preso politikok babestu zuten Batzordeen jarrera agiri baten bitartez. Soriako zartagina irakitan zegoen, baina ETA m-ko kideek hartuta zuten kirtenetik.

Borrokaren lekukoa hartzeak errepresioaren jopuntuan kokatu zituen, jakina. Erreformaren aldeko jarrerak gero eta nabarmenago errotzen ari ziren poli-milien komunan, eta Euskal Kontseilu Orokorreko delegazio baten bisitak uxatu zituen zalantza guztiak. Autonomiari bide emateko sortutako instituzio kamuts haren legitimazio eza salatu zuten preso gehienek, miliek eta autonomoek, Soriara joan eta presoekin hitz egin nahi zutela eskatzerakoan. Bandrés abokatua bozgorailu gisa erabiliz, ordea, pm-ek aginte-iturri legitimo bakartzat jo zuten handik egun gutxitara, bi adarren artean zegoen arrakala sakonduz.

Giro politikoaren zer-nolakoek eztabaidak piztu eta berotzen zituzten intentsitate berberarekin hausnartzen zen Soriako erronkari nola aurre egin. Lehen tira-birak gainditu ostean, 1979ko martxoaren 6an gose greba mugagabeari ekin zioten ehunda bat presok. Miliak eta autonomoak ziren, eta laster batean Carabanchelen ere eman zitzaion jarraipena. Enbidoa jaso, eta hordago handira bota zuten.

Protestaldiaren helburuak bi mailatan koka daitezke: Soriako bizi-baldintzen hobekuntza, alde batetik, eta, amnistia orokorra zein iheslarieekiko elkartasuna bestetik, garai berekoak baitziren Iparraldeko sarekadak eta jazarpenak. Dudarik gabe, guztiz politikoak ziren erreibindikazioak, kartzela barruko egoera samurtzera mugatzen ez zirenak.

Hamabost egun zeramatzatela, etxekoen eta abokatuen bisitak hartzeko gero eta neurri gogorragoak ezarri zitzaizkien presoei. Holako estualdiak poliziaren konpainia berrien etorrerarekin gertatzen ohi ziren, eta otsailaren 10ean mintzalekuetara joateko lehenago biluzik, larrubizirik jartzeko agindu zieten poliziek. Ezetz erantzun zuten presoek, larrugorritan jartzeko ez gogorik ez asmorik zutela, eta arropa kentzekotan, beraiek kendu beharko zizkietela. Orduan, poliziek bisitarik gabe geratuko zirela erabaki zuten. Egoera tenkatu zen, eta azkenean poliziek amore emanda, egin ziren bisitak

Jateari utzi ez zioten hainbat presok zainak moztu zituzten bi txandatan. Lehendabizikoan hogeita bat, eta bigarrenean, gose-greba amaitzear zegoela, hogeita bederatzi kidek ebakidura sakonak egin zituzten beren soinean aihotzak erabiliz, hain handiak non kartzela zaindari batzuk mareatu ziren, erizaindegiko odolustearen bista zirraragarria zen-eta. Hamaika kide Soriako hospitalean artatu behar izan zituzten, hiriko inarrospena eraginez. Handik egun gutxitara, euskal presoak Euskal Herrira bueltatzea eskatu zuen Soriako udalbatzak, hiriari egiten zitzaion kaltea eta bere "izen ona" lohituta geratzen ari zela argudiaturik.

Ekimen gogor harekin, euskal jendartea astindu eta errepresioari marra gorri bat marraztea lortu zuten, nahiz eta kidegoak oso modu lazgarrian gomutarazten duen. Juan José Regok halaxe kontatzen du pasadizo hori:

> “*Gau hura beldurgarria izan zen. Zainak moztu zituen kide bati suturazko hogei barne-puntu eman behar izan zizkioten, eta galeriak odolezko putzuez gainezka zeuden. Baita hormak ere, presoek "Gora ETA", "Gora Euskadi" eta antzerakoak idatzi baitzituzten odolez. Tendoiak ikututa, behatzen mugikortasuna bera ere galtzekotan egon ziren zaurituri larrienak. Eta hura gutxi balitz, hospitalera eramaterakoan bultzaka eta burlaizez atera zituzten poliziek, "ea ospa egiten saiatzeko potroak dituzuen" esaka eta esaka. Soilik Herriaren esku zegoen euskal presoak Soriatik ateratzea.*

Gose grebak hilabete eta koska iraun zuen, eta Burgosera trasladatuta izan zen Juan Jose Rego Vidalek ia azken bururaino eraman zuen. Bere egoeraren larritasunagatik kezkak janda, libre utzi zuten epaitu baino bost egun goizago, beldur baitziren kartzela barruan ez ote zen hilko.

Egun, Mansilla de las Mulas-en dago preso, gaixoturik, 1995ko udaran berriro ere atxilotua izan zelarik.

Martxoaren 6an amaitutzat eman zuten gose-greba Soriako presoek. Hala eta guztiz ere, protestaldian zehar mila bider errepikatu zena errealitate bihurtuz, gertakari oso larri bat jazoko zen jaten hasi eta handik bi egunetara. Konpainiaren kapitainak eta teniente batek gidatuta, hamarka polizia sartu ziren laugarren galerian, eta bertan zeuden presoak txikitu zituzten. Zauritu kopurua hogeitik gorakoa izango litzateke. Zakurren tentua nahiko buruberoa zen, eta hainbat poliziak besteak lasaitzen ahalegindu ziren, metraileta eskuan edozer gauza egiteko gai baitziruditen. Aldez edo moldez, presoek irabazita zeukaten gudua eta 1979ko uztailaren 9an Soriatik irten ziren FOP gorrotagarriak, bost egun lehenago bisita greba hasi berria zutela.

## **Basabidea** *edo bidezidorra*

Apirila eta uztaila bitartean mobilizazio erraldoiak egin ziren Euskal Herrian Soriako egoerari irtenbidea emateko. Poliziak zapuztu zuen Soriako martxa batek milaka pertsona mobilizatu zituen, eta ehun mila lagun inguruk mukururaino bete zituzten Bilboko kaleak. Regok nabarmendu zuenez, euskal herritarrek lekukoa hartuta, garaitezina zen presoen Kolektiboa.

ETA pm-k berezko ofentsiba armatua burutu zuen uda hartan. Gune turistikoetan jarritako lehergailuak zartaraziz, abian jarri zuen "Estatutoarekin presoak kalera" deituriko kanpaina. Ofentsiba bertan behera uzteko baldintza bikoitza kartzeletako egoerari lotu zitzaion: Polizia Soriatik atera eta euskal preso politiko guztien aberriratzea. Publikoak izan ez ziren hartu-emanak eman ziren gobernua eta polimilien artean, baina UCDk ez zuen sekula onartu presoak Euskal Herriko espetxeetara itzultzea, beraz, uztailaren amaieran gogortu egin zen bonben bidezko oldarraldia. Eta Atocha zein Chamartin-eko geltokietan eta Barajaseko airoportuan jarritakoek eztanda egin zuten abisua emanda ere, poliziak ez baitzuen jendea desalojatu. Eztanden ondorioz sei pertsona hil ziren eta itzeleko dardara zabaldu zen estatuan eta Euskal Herri osoan.

Ezusteko gertakari horrek are gehiago mikaztu zuen mili eta polimili presoen arteko harremana. Aurreko uztailaren 12an, pm-ek Autonomia Estatutuaren aldeko jarrera erakutsi zuten Soriatik, eta jada nahiko zulatuta zegoen elkarbizitzak behea jo zuen. Iskanbilak egon ziren, baita enfrentamendu fisikora pasatu zirenak ere.

Mesfidantzen zakua betetzen ari zen apurka-apurka, eta Madrilgo ekintzak egin ostean polimiliek eten egin zuten "Estatutoarekin presoak kalera" lelodun kanpaina. Hori ikusita, gobernuak saritu

zuen beren erabakia, eta 13 polimili preso eraman zituzten Soriatik Basauri eta Martutenera.

Tentsiouneak lotura zuzena zeukan Euskal Herrian ematen ari ziren Estatutuaren inguruko eztabaida liskartsuekin. Errefusaturiko Konstituzioaren mugetan barna zegoen eta Hegoaldeko lurraldeak bi zatitan banatzen zituen proiektuaren inguruan polemika bizia zegoen alderdi eta eragileen artean, are zailagoa errepresioaren hatzaparrek ezker abertzale gupidagabeki kolpatzen zuten hartan. PNV, EE, ESEI eta urte luzetan larru-azal abertzalea jantzita eraman zuten bestetzuek, aldeko apostu sendoa egin zuten, eta KAS alternatiba defendatzen zuten ezkerreko independentistek gogor ekin zioten abstentzioaren aldeko posizioari. Euskal Herriari egin nahi zitzaion iruzurrak data eta guzti zuen: urriaren 25an erreferenduma deitu zen-eta, Gernikakoa batzuek eta Moncloakoa besteek izendatu zuten 1979. urteko Estatutua hautespide




Aldeko eta kontrako dialektika gartsuak kartzela barruan ere izan zuen isla. Horrela, irailaren 25an Estatuaren alde gose greban hasi ziren ETA pm-ko 26 preso. Aldibereko mobilizazioak deitu zituen Euskadiko Ezkerrak bi erreibindikazio nagusi gainerakoen gainetik aintzat hartuta: "Estatutoarekin presoak kalera", "Estatutoarekin Nafarroa Euskadin". Hiru egun geroago Sorian, Basaurin eta Iruñako kartzeletan zeuden miliek ere gose grebari ekin zioten, amnistia galdatuz, Hendaian itxita zeuden errefuxiatu politikoen eskakizunak eta gose greba babestuz eta, halaber, erreferendumean abstentzioa eskatuz. Bi autonomok bat egin zuten protestaldi harekin, eta

Zamora zein Carabancheletik ere elkartasunezko ekimenak abiatu ziren, "Euskal Herriko borrokarekin" bat. Ezin argiago ikustarazten ziren Euskal Herriko etorkizuna proiektatzerakoan lehian zeuden egitasmo erreformistaren eta iraultzailearen arteko interesen gatazka. Maximo Aierberen oroitzapenek balio dute egoera kafkiano hura deskribatzeko:

> *Lehen aipatutako hipokresiak goia jo zuen Estatutuaren alde polimiliek egin zuten sasibarauldiarekin. Euskadiko Ezkerrako buruzagiek ekarritako kontsignari halamoduz jarraitu zioten, eta ustezko gose greba hartan fruitu zukuak eta yogurrak hartzen zituzten bitartean, Bandrés, Onaindia, Martin Auzmendi eta beste politikari ustel batzuek kaka esplikatzen zuten Euskal Herrian, presoen jarrera eta pentsamenduari buruz gezur giroa eta nahamendua zabaltzeko. Zirimola haren erdian, besteok, ohi legez, geureari eutsi eta ura besterik ez genuela sabeleratzen geunden.*

Enrique Múgica Herzog buruzagi sozialistak marraztu zuen ezberdintasuna esaldi honekin: "egia da biolentoen artean ere graduak badaudela. Soriako kartzelan Estatutuaren alde edo kontra gose greba egin duten gizonezkoak ez dira berdinak". Enrique Galavís Espetxeetako Zuzendari Nagusi izendatu zuten azaroaren 2an, eta jesuiten artean hezitako ingeniari honek praktikara eraman zuen Múgica faxistaren gogoeta.

ETA pm-rentzat hil ala bizikoa zen presoak askatzea. Izan ere, bere estrategia politiko-militarra oso perspektiba laburrekoa izanik, sinesgarritasuna izatea funtsezkoa baitzitzaien. Hori zela eta, "Estatutoarekin presoak kalera" kanpainaren bigarren faseari eman zion hasiera 1979ko azaroan, Javier Ruperezen arrestatzearekin. UCDko parlamentari eta alderdiko nazioarteko arduraduna, kolpe latza izan zen estatuarentzat, eta ataka zailean kokatu zen konponbidea bahiketaren amaiera espetxe frontearekin lotutako erreibindikazioekin uztartu zenean. Askatzeko baldintzak bi ziren:

> *1.-Gaixotasun larriren bat daukaten euskal preso politikoen berehalako askatzea, zehazkiago: Bihotzeko gaitza duen Antonio Etxezarraga; odolean azido urikoa duen Domingo Irisarri; soinean hiru bala dituen Kike Zurutuza; duodeno ultzera duen Juan Ignacio Mentxaka eta Luis María Exposito.*
>
> *2.- Gure Herria jasaten duen indarkeria instituzionala ikertuko duen batzorde baten sorrera. Euskal Kontseilu Orokorrak eratuko duen batzorde horretan parte hartu beharko dute Euskal Herriko alderdi politiko, sindikatu eta kultur instituzio guztiek.*

Beste era batera esanda, erakunde armatu guztietako kideak nahasten zituen bere ekimenean, eta, zehar bidez, EAEn lehen urratsak ematen ari zen bilbadura autonomikoari egundoko protagonismoa eman nahi zion. Hilabete bat beranduago Ruperez askatu zuten, eta lortutakoaren bilana ez zen etxaferuak botatzeko modukoa. Osasun arazoak zituzten poli-miliek preso jarraitzen zuten, eta Mentxaka, Exposito eta Zurutuza presoek trukerako txanpona izateari uko egin zioten publikoki, etsigarria eta interesatua zen kanpaina haren leit motiva arbuiatuz. Lorpen bakarra

izan zen epaitu gabe zeuden hogeiren bat preso poli-milien askatasuna eta Mario Onaindia EEko buruzagiaren kontrako epaiketa bat bertan behera geratu izana. Orduan ere, plaza horretan etxe barrukoak lehentasuna zuen, sator-tratuetan barne.

1979. urtearen akaberan, 142 euskal preso politiko zenbatu zituzten Amnistiaren Aldeko Batzordeek, eta "Amnistia ez da negoziatzen, Herria ari da lortzen" mezu indartsuak ardazten zuen presoen aldeko herri borroka. Askatasunaren bidean bide-zidorrik ez zegoen.

## **Soria,** *oraindik*

Euskal preso politiko gehien zeuzkan presondegia Soria izaten jarraitzen zuen, eta bertantxe logika bakarra katua saguaren atzetik ibiltzea zirudien, bestea mendean nork hartuko. Polizia kartzela barruan uneoro ez zegoen arren, egunero bi sarraldi egiten ohi zituen, presoak eta ziegak arakatzeko. Antidisturbios konpainiaz gainera, informazio alorreko inspektoreek ere jarduten zuten ziega eta galerietan, Jose Antonio Olagorta Txontak lerrootan biziki ondo deskribatzen duen modura:

> *80ko abuztuan iritsi nintzen Soriara, eta horma baten kontra hiru orduz eduki ninduten ongi-etorri gisara. Gela batean sarrarazi, biluztu ninduten eta, segituan polizia inspektore batzuk etorri ziren. Jarraian, porrazoka korridore bat zeharkatzera behartu ninduten, kideengana iritsi nintzen arte. Kartzelak horrela funtzionatzen zuen, zartakoka. Zakurrak goiz eta arratsaldez sartzen ziren gu miatzeko, eta espetxeko agintea ez zegoen zuzendariaren esku, ejerzitoko koronel edo teniente koronel baten kargu baizik. Gainera, hiru hilabetero aldatzen zituzten polizia konpainia guztiak apur bat lehenago Euskal Herrian egonak ziren, egun osoa istiluetan eta furgonetatik irten gabe. Konpainia mugikorrak izanik, manifestazioetan egurra banatzen zuten eta xurrutean ez zuten parekorik.Beti zetozen ekintzetan polizi-kideren bat galduta, eta, noski, ero moduan agertzen ziren. Goizeko hiruretako kontaketan bertaratzen ziren haiek, ez kartzelariak, eta egunaren arabera, gertakarien harira, txalo batzuk jaso genitzakeen. Militarren kontrako ekintzaren bat zegoenean, gauminean patiora irtenarazi eta segituan galdekatzen gintuzten. Bisitara joateko araketa edo paketean sarturiko arropa, janaria eta beste inspektoreek zurrun kontrolatzen zuten.*

Baina esaera zaharrak dioen bezala, egunaren itzalak bere izara beltzak zabalduko ez balu, ihintzaren zilarrak ez luke distiratuko gure barne-muinetan. Alabaina, Soriako presoek errepresioa sahiestu eta borrokatzeaz gainera, bazuten bestelako eginkizunik. Lur-azpiko iluntasunean zulatzen ari baitziren askatasunerantz eramango zien ihesbidea.

Zortea etsai, ordea, eta 79-80 urteen mugetan hiru zulo ezberdin hasi eta aurkituak izan ziren

Sorian. Martutenen, aldiz, polimilien egikera batek hiru preso -Izaskun Arrazola, Jesus Maria Salegi y Mikel Matxirena- askatzea lortu zuen. Bisita egin eta gero, armak eskuan zutela, senideen artean irten ziren 1980ko urtarrilaren 20an. Donostia egun espeziala izan zuten.

Dena dela, Soriako espetxeko historia beltzean zalaparta gehien sortu zuen gertaera 1980ko ekainean jazo zen. Hilak hamalau zituela, brigada antiterroristako poliziak ziegetan sartu eta presoen ondasun txikiak puskatu zituzten (arropa, argazkiak, gutunak, eskulanak,...). Haserre bizian, presoek kontuak eskatu zizkioten poliziaren konpainiaburuari, eta eztabaidan galerian sartzeko ate bateko beira puskatu zuten kideek. Nahikoa eta sobera prestatuta zeukaten mendekuari bide emateko. Karga orokorra izan zen, galeriaz galeria egindakoa, eta gomazko pelotak barra barra erabili zituzten, ondo-ondotik jaurtikitakoak, horren hurbiletik non polizia batzuk pelotek jota zaurituak suertatu baitziren. Sarraskia egin bitartean, sukaldeko labain bat astintzen zuen komandanteak. Triskantzaren ondorioz, 21 preso zaurituta izan ziren, horietako zortzi oso larri. Iñaki Pikabea oreretatarra zerraldo zegoelakoan utzi zuten lurrean, konortea galduta eta txiki-txiki eginda. Gertatutakoaren kronika beldurgarria izan zen:

> “ *Kargatzeko gogoa zeukaten, besterik ez, eta apetak bultzatuta kargatu zuten, gure aldetik probokaziorik txikiena ere egon gaberik. Jendea ikasten ari zen, bestetzuk telebista ikusten edo garbiketa egiten, eta halako batean galeria ezberdinetan kargatzen hasi ziren. Imaginatu egoera: galeria txiki batean, grisen konpainia osoa sartzen dela ikusi eta, komandante labana eskuan aurrean dihoala, gure atzetik korrika hasten zirela. Deskribaezina egoera, tiroak hurbil-hurbiletik botatzean, "akatu behar ditugu, akatu behar ditugu" txilioka baitzihoazen.*

Presoen senideek itxialdia egin zuten Jaurlaritzako egoitzan, baina Ertzaintzaren kimuak ziren berroziek indarrez atera zituzten. Presoek, bestalde, komunikazio greba berri bat hasi ziren, polizia kartzelan edozer gerta ere sar ez zedin exijituz. Giro korapilatsu hartan interes turistikoen aurka polimiliek udaran abiatu zuten kanpaina berriak bete-betean inarrosi zuen egoera. Izan ere, bonba jartzea eteteko hemeretzi presoen askatasuna eta Soriako espetxeko zuzendaria kargugabetzea finkatu baitzuten baldintza modura.

## Sorian zaurituriko presoen izen-abizenak

Iñaki Pikabea Buruntza
Tomax Karrera Juarros
J. Maria Olaizola Eizagirre
J.Maria Etxaniz Zorrilla
Fco. Javier Zurikarai Lejarreta
Juan M. Garmendia Mendiola
Patxi Senar Ijurko
Agustin Kortes Lorenzo
Juankar Alberdi Martiarena
Eugenio Ulaiar
Manuel Beraza Felanes
Jesus Razkin Mendinueta
Iñaki Ibabe Guridi
Iñaki Albistur Bermudez
Miguel Arguilés Torregarai
Jose Maria Juaristi Gabilondo
Ion Esturo Loyola
Jose A. Cid Márquez
Josefa Eizagirre Mariscal
Juanito Trecet Sastre
Miguel Angel Olabarria

Halakoetan nahiko eskarmentua bazuten ere, eskatu beharreko presoen zerrenda bi milien izenak ipini zituzten, Mitxel Sarasketa eta Jose Migel Azurmendi. Ondorioak ez ziren berandu iritsi, egun gutxi pasa zirela, Sarasketa eta Azurmendi, gainontzeko hamazazpi polimiliekin batera, Herrera de la Manchako zigor-moduloara eraman baitzituzten, arropa eta beste edozer kenduta, buzo urdin bana eta txankletak baino ez zizkieten eman. Haiek izan ziren gotorleku berria ezagutuko zuten lehen euskal preso politikoak.

Carabanchelen ere zakurrik oinutsik, abuztuan beste razzia burutu baitzuten, kasu honetan kartzelariek, motin baten aitzakitan. Zehazkiago, zaindari batzuk jipoitu izana leporatuta, bosgarren galerian sartu ziren jo ta su, porrak eta gasa erabiliz bat-batean, presoak xaxatu nahian eta asmo bakarrarekin: espetxeratuen sakabanaketa justifikatu inolako presio politikorik gabe. Beraz, aipatu iskanbila gertatu ondoren, hemezortzi preso sozial eta politiko trasladatu zituzten Burgos eta Herrerara.



***Carabanchelgo sarraldia eta geroko panorama: galeria hankaz gora eta poliziak nonahi.***

Isolamendu eta urruntze politikak eragin berezia eduki zuen bere hastapenetik egundaino emakumezko militanteengan. Emakumezko burkideentzat isolamendu eta deserriratze politika Madrileko Yeserias espetxean hasi zen Carabanchelera iritsi aurretik. 80. hamarkadaren hasieran Espainiako estatuak emakumezkoentzako espetxe nahikorik ez izateak de facto deserriratze prozesua suposatu zuen.

Yeserias, Franco garaian atzerriko berriemaileei erakusteko prestatu zen kartzela zen. Goian bakarreko gelak zituen, txiki txikiak, airerik ere sartzen ez zela. Ez ziren zigor gelak ordea, ez. Sasoi hartan 50 gradutako beroa izatera ere iritsi ziren euskal presoak. Ezin izan zuten bi egun baino gehiago iraun. Ohiko galeria handia zen. Gela batzuk ziren han, eta ixten zen ate bakarra galeriakoa da, honela harremanak errazagoaz izaten ziren. Banakoetan, berriz, atea ixtean, akabo.

Urtea amaitzear zela, jadanik 220 kide zituen euskal preso politikoen kolektiboak. Horietako hiru zeuden Yeseríasen: Miren Egaña, Fatima Ibarra eta Françoise Maruenda.

## **Ke** *arteko egunak*

Urte berria ez zen nolanahikoa izan. Ez kartzeletan, baina are gutxiago kalean, non gora handiko gertaerak elkarren jarraian eman ziren. Urtarrilaren 29an, hain zuzen ere, Adolfo Suárez gobernu espainiarreko presidenteak dimititu zuen egunean, ETAm-k José María Ryan Lemoizko zentral nuklearreko ingeniari-burua arrestatu zuen. Otsailaren 6an Ryan-en gorpua agertu zen, izan ere, egun hartan ETAm-ren eskakizunak betetzeko epea amaitzen baitzen, hau da, zentral nuklearra eraisteko epea. Bi egun lehenago, otsailaren 4an, Espainiako Erregea Gernikara estreinakoz etorri zen eta herritarrek euren haserrea adierazi zioten. Egun horretan bertan poliziak Joxe Arregi Izagirre Madrilen atxilotu zuen. Handik bederatzi egunetara, otsailaren 13an, Carabanchel Espetxeko Ospitalean hil zen, Segurtasuneko Zuzendaritza Nagusian (DGSn) jasandako torturengatik. Ryan-en eta Arregiren heriotzen ondorioz, hainbat manifestazio eta greba antolatu ziren Euskadi osoan zehar.

Aste mingots hauen ostean, otsailaren 23ko gertaerak izan ziren. Estatu-kolpearen ondorioz, botere errealek berrantolatu zuten estatu eredua, erreformaren norabidea eta barne-etsaiaren kontrako estrategia (Euskal Herria jomugan) zorroztuz. Otsailak, ordea, ustekabe gehiago zekartzan. Izan ere, otsailaren 28an, ETA pm-k su-etena iragarri zuen, urtebete geroago behinbetiko su-eten bilakatu zena. Euskal Herriko zenbait tokitan, ilbeltza edo hil beltza esaten zaio otsailari, bere gauak luzeak direlako eta egunak, laburrak. Soria eta Carabancheleko gauak, luzeak baino amaigabeak izan ziren euskal preso politikoentzako.

Gogorra da oso zurekin batera kartzelan dagoen kidearen oinazea gertutik ikustea. Jasangaitza ere bada, eremu opakoetan, izugarrikeriak pairatu eta alboko lagunari bizitza sudur hobietatik ihes egiten zaiola antzematea. Heriotzak gainzama dakarkigu ezinaren giltzapeko menpe-lurraldeetara. Joxe Arregi hilurren sartu zen Carabancheleko espetxe-hospitalean, eta horratik irudi

hura ahaztuezina izan zen garai hartan bertan zeuden Isidro Etxabe eta Iñaki Agirre euskal preso politikoentzat. Lehenak komisaldegian bertan ikusteko parada izan zuenez, saminaz gogoratu zuen elkarri emaniko azkeneko begiratu zorrotza:

> *Komunera ninderamaten batean ikusi ahal izan nuen. Gurpildun aulki batean eserita. Haren irudia barrutik lehertutako pertsonarena zen. Atxilotu eta zortzigarren egunera, gu nahi adina txikitu eta gero, sotoan topatu nuen berriro. Argazkiak ateratzera eramanak gintuzten eta izutu egin ninduen egoera hartan ikusteak. Epilepsia atake antzekoa eman eta lurrera erori zen, ahotik bitsa zeriola.*

Hurrengo egunean, Carabanchelen jadanik, Iñaki Agirre Errazkin euskal presoa eta Xoxe Lois Fernandez Gonzalez eta Lois Alonso Riveiro, Grapokoa eta PCE(r)-koa hurrenez hurren, Joxe Arregik azken arnasa eman zueneko lekuko zuzenak izan ziren. "Oso latza izan da" utzi zuen epitafio, torturen aurkako garraxia presondegiko galeria ilunetan barrena barreiatzen zela. Gure Kolektiboak erraietan sentitu zuen hilketa hura, komisaldegitik lagunak apurtuta etortzen ikustera ohituta bageunden ere. Latza izan zen guztiontzat. Gogorra bezain argigarria.

Alta, zetorrena ere ez zen makala izango eta otsailaren 23ko autokolpearen ondotik gorriak ikusi genituen kartzela barruan, bai Sorian bai Carabanchelen sartu eta garbituko gintuztela sinetsita baikeunden. Juanito Carbajal Asturias Sorian zegoen gau hartan, eta haren testigantza honetan ondo laburbiltzen da saman labaina izatera sentitzera iritsi ginen ordu haietako gomuta:

> *Garitetatik grisek holakoak ohiukatzen zuten: "garbituko zaituztegu; oraintxe sartuko gara eta ikusiko duzue!". Tentsio handiko unean izan ziren, eta gutako gehienak benetan etorri eta sakailduko gintuztelakoan geunden.*

Carabanchelen antzekoak entzun behar zituzten kideek leihoetatik kartzelariak bildu eta isolatu ondoren, baina, geroago jakin denez, uste baino gertuago izan zuten herioaren sega. Izan ere, matxinatuen artean zegoen Pardo Zancada komandantea bertaratu baitzen kartzelako ateetan, pelotoi baten laguntzaz preso politikoak eraman eta afusilatzea agindua zuelarik. Azkenekoz, sarrerako guardia zibilek atzipen-agindua falta eta, batez ere, kolpearen badaezpadako etorkizuna aintzat hartuta, ez zituztela ateak zabaldu.

## **Irlandako haize zakarrak** *urratu zigun bihotza*

1981eko martxoaren 6an, irlandar preso politikoek gose greba bati hasiera eman zioten kartzelako egoera salatzeko eta, batez ere, estatus politikoa berreskuratzeko. Apirileko hausteskundeetan, gainera, parlamentario aulkia lortu zuen horietako batek, Bobby Sands, eta honek egoera zailean

ipini zuen Margaret Thatcherren gobernua. Grebak eragin mediatiko handia izan zuen eta Irlandako gatazka lau haizeetara zabaldu zen. Honek britaniar gobernuarekiko presioa igoarazi zuen baina, hala ere, gobernuak ez zuen atzera egin eta giza eskubideak ukatzen jarraitu zuen.

Sands 1981ko maitzaren 5ean hil zen, 66 egun gose greban eman ondoren. Gerora, IRAko eta INLAko beste 9 kidek ere bide bera jarraitu zuten eta protestan hil ziren. Britaniarren jokabide doilorrak muga guztiak hautsi zituen. Esaterako, Patsi O'hara, hildako laugarren gose grebalariari, hil ondoren soldaduek sudurra hautsi zioten kolpeka, baita aurpegia erre zigarroak bertan itzaliz. Ezaguna genuen demokraten lizunkeria, eta ezerk ez gintuen harritzen, baina Irlandako borrokan anai-arreben egunez egunekoa oso era berezian jarraitu eta sufritu genuen geure baitatik.

Mitxel Sarasketa eibartarrak esku trebez utzi du idatzita gure Kolektiboaren hausnarketak eta, batez ere, sentimenduak gertakaria haien kariaz.

“

*Ni espetxean nintzen Bobby Sands, Francis Hughes, Raymond McCreesh, Patsy O'Hara, Joe MacDonnell, Martin Hurson, Kevin Lynch, Kieran Doherty, Thomas McElwee eta Michael Devine hil ziren 1981. urte hartan.*

*Gure artean identifikazio handia izan da beti Irlandako burrukarekin. Identifikazio horrek, gainera, beste maila hartzen du kartzeletan. Kartzelan irudiek, ametsek eta emozioek betetzen dituzte presoaren espazioa eta burkideen arteko giro horretan batzuetan ez dituzu "ni", "zu" eta "gu" oso ondo*



***Long Kesh-en gose greban hil ziren hamar irlandar preso politikoak.***

*bereizten. Carabanchelen zaude, Long Keshen, eta burrukan ari gara.*

*Gauzak horrela, Long Kesheko burrukaldia eta gose greban hildakoen irudiak determinazio osoaren ikur bilakatu ziren guretzat. Oso prozesu dramatikoa izan zen. Euskal preso politikoen artean inpotentzia eta miresmen izugarriarekin bizi izan genituen Long Kesheko burrukaldien eta gose greban hildakoen gainean jasotzen genituen berriak. Guretzat oso gertukoa zen guztia. Baina, aldi berean, guk ez genuen Irlandako kartzela barruko prozesua ondo ezagutzen. Irlandako errepublikarrak armak eskuan herria defendatzen ari ziren askatze prozesu batean, guk gure herrian ari ginen bezala. Preso errepublikarrak kartzelan ere burruka horretan murgilduta jarraitzen zuten, gu ahalegintzen ginen bezala. Hortik aurrera prozesu bakoitzak bere dinamika jarraituko zuen. Eta gogoratzen dut gure miresmenean ez genuela ulertzen gose greban hiltzerainoko ekimena. Edo horrelako gose greba egitea gure eskemetatik aparte zegoela.*

*Euskal Herrian ere 1981 oso urte bizia eta gogorra izan zen. Errepresioa, ekintzak, grebak, hildakoak... erritmo frenetikoan gertatzen ziren. Kartzelan zigor neurri berriak aplikatzen hasi ziren, espetxe politika berria diseinatzen ari zirela antzematen zen, bahitu politikotzat hartzen gintuzten askapen prozesua baldintzatzeko eta gure dinamiketan, ororen gainetik, mezu bat zabaldu nahi genuen: ez dugu inoiz amore emango. Guretzat horixe zen Long Kesheko mezua, eta horrela egingo genuen aurrera kartzela egoerarik ankerrenean ere.*

*Espetxe politikak gure artean molde eta eraso berriak ekarriko zituen askapen prozesu osoa espetxeetako frontean garaitzeko asmoarekin, eta euskal preso politikook erresistentzia dinamika batekin jarraitu genuen. Egoera ez zen txantxetakoa. Espainiako gobernuak sakabanaketa, isolamendu eta zigor espiral batean sartu gintuen espetxeetan. Baina egoera gogorrenetan beti izan dugu Irlandako preso errepublikarren burrukaren irudia ere gogoan: ez dugu inoiz amore emango.*

*Burrukaren gorabeherak askapen prozesuaren norabideak argitzera jo du denborarekin gure artean. Irlandako prozesu politikoak gatazka politikoa gainditzeko eredu modura hartzea ere ekarri du Euskal Herrira. Horretara, Irlandako prozesua sakonago aztertzean, bertan preso errepublikarrek jokatu duten papera sakonago aztertu izan dugu. Eta orain, orduko espetxe egoera eta beraren testuinguru politikoa hobeto ezagutu dugunean, denboraren perspektibarekin ere esango nuke azken urteetan ulertu dugula zerk eraman zuen 10 burkide haiek hiltzeraino gose greba egitera. Aurrera egiteko ez zieten beste biderik utzi. 1981eko gose greba hartan H-Bloketako preso errepublikanoek gatazka gainditu beharrean eman zuten bizitza.*

*Espetxeetan euskal preso politikoek azken urteetan erresistentzia dinamika batetik pausuak ematen joan dira prozesu politikoa azkartzeko euren izaera politikoaren aldarrikapena mahai gainean jartzeraino. Begiratu, eta paralelismo izugarria dago orduko hartan preso errepublikarren aldarrikapenen aldean. Ez da harritzekoa. Gatazka gainditu beharrean ari gara hemen ere.*

*Horretara, 1981eko gose greban H-Blokeetan hildakoek eta burruka hark gurean izan duen ekarpen nagusia Irlandako askatze prozesua bizkortzea izan da dudarik gabe, askatze horren bidetik gainera -koak ere askatzen goazelako. Gure esku dago orain prozesua bururaino eramatea. Burruka da bide bakarra.*
***Tiocfaidh ár lá!***

## **Puerto de Santa Maria,** *gaztigu-eremua*

Orduan Herrera dela Manchako kartzelan zeuden Grapo-ko kideak borroka luze bat ari ziren burutzen, bertoko bizi-baldintzak leuntze aldera. Bera eta bere kideen eskaerak argiak ziren, batetik, tratu duin eta gizatiarra, eta bestetik, kartzela hartatik ateratzea. Laurogeita hamar egun jan gabe egon ondoren, ekainaren 19an hil zen, Madrilgo hospital batean, Juan José Crespo Galende gallartarra.

Frantzian, bestaldetik, François Mitterrand hautatu zuten Errepublikako presidente. Pierre Mauroy lehen ministroarekin batera, politika aurrerakoia tajutu zuen arlo zabaletan bere agintaldiaren lehen hilabeteetan. Hori zela eta, euskaldunek itxaropentsu hartu zuten PSFko idazkari nagusi ohiaren etorrera: departamentuaren sorrera, amnistia, errefuxiatu estatutua, arlo sozialeko neurriak eta eskubide zibilak babesteko doktrina zeuden, promesa gisan bazen ere, haize berria baikorki hartzeko oinarri-oinarrian. Izan ere, garai hartan Ipar Euskal Herrian jardun zuen *Hordago* antolakundeko presoak kaleratuak izan ziren, eta kartzelan zeuden hainbat iheslarik ere *(Tomas Linaza kasu)* atzean utzi zuten espetxeko atetzarra, nahiz eta Espainiatik extradizioa eskatuta zeukaten. Nolanahi ere, gutxi iraun zuen itxaropenaren udaberriak.

Eta udan sartuak jadanik, uztailaren 21an hain zuzen ere, kartzela barruko errepresioaren torlojua estutzeko urrats berri bat eman zuen espainiar gobernuak: Carabanchelen zeuden ehunda hemeretzi euskal preso politiko, miliak eta autonomoak, Puerto de Santa Mariako penalera eraman zituzten. Penintsularen beheko erpinean zegoen gotorleku madarikatu haren konnotazio historiko-errepresiboak aski ezagunak ziren, bertan espetxeratu eta erail baitzitutzen hamarka euskal preso 36ko gerra osteko mendeku aro amaigabean.



***Euskal preso politikoak Puerto de Santa Marian.***

Lekualdatzearen arrazoi ofizialak Enrique Galavísek eman zituen jakitera. Espetxe Zuzendari Orokorraren ustean, Euskal Herritik "gertuegi dago Soriako kartzela, eta hori eragozpen handia da". Garai hartan Fernandez Ordoñez zegoen Justizia ministraritzan, eta, EAEn, Carmelo Renovales zen justizia sailburua. Batek agindua eman zuen, eta besteak, morroi autonomiko leiala, gogor jipoitu zituen haren babesaren bila hurbildu ziren presoen senideak. Aho biko ezpata, beste behin ere.

Trasladoa oso ikusgarria izan zen. Berrogei bat ibilgailuk osatzen zuten komitiba luzea, sirenen uluak eta guardia zibilen txilibito zarata, aginte hotsak eta abar beste edozeren gainetik nabarmentzen zirela. Lehen unetik oso garbi geratu zen aldaketa zetorrela, hura ez zela edozelako egokitzapena. Juanjo Larrinaga zornotzarrak zimurtzen du bekokia pasarte hura kontatzerakoan:

> *Gaueko hirurak aldera edo etorriko ziren. Ziegaz ziega, trasladoa genuela esan eta galeriara jaisteko agindu ziguten Carabanchelgo kartzelariek. Bertan, mahai bat ipini zuten guztion datuak jasotzeko, eta egundoko guardia zibil pila zain genituela ikusi genuen berehala. Ganadua bagina eraman gintuzten furgoi handietara, eta zarata handiz hasi ginen lekualdatzea. Hogeita bi ordu eman genituen errepidean, batzuetan martxan eta, besteetan, eguzkipean erabat lagata, ordu luzez jardun baitzuten guardiek otorduak egiten: lehen geldialdia Madriletik kanpo, eta bigarrena Extremadura aldean. Izerdi patsetan, plastikozko ur-botilak deformatzen zitzaizkigun beroaren eraginez. Ez dakit nola iritis ginen osorik. Puertota iristean, Polizia Nazionalak gure esperoan zeuden, pasillo luze bat eginez. Tentsio handiz, ziegetaraino eraman gintuzten.*

Zer dela eta Puertora? UCD eta EEko buruzagien arteko isilpeko negoziazioen ondorioz, ETA pm-ko hainbat presok destinu erosoa aurkitu zuten Langraizeko presondegian. Izan ere, 1981. urte bukaeran espetxe hartara eraman baitzituzten 18 poli-mili. Rosón eta Onaindia buru zirela, hartu-eman biziak zeuden martxan Tejerok amore eman zuenetik, helburu bakar batekin: ETA pm desegin eta behin-beinekoa zen su-etena betiereko bihurtzea. Hemezortzi kide haien lekualdatzea izan zen, nonbait, marko hartan UCDk egindako lehen keinua. Nolanahi ere, bi espetxe eredu finkatu ziren orduz geroztik euskal preso politikoen trataerari begira: *terrorista onentzat* bat, eta t*errorista gaiztoentzat* bestea.

Guztira ere, militarren eta estatuko sektore atzerakoien gorrotoari bide eman edota Kolektiboaren baitan antzematen zuten batasuna pitzatzeko ahalegin gisa ezaugarritzen duten iritziak badaude egon. Luze doa galdera guztiei erantzun doia aurkitzea, eta are luzeago etsaiaren burutik zer pasatzen den asmatzea, baina, dudarik gabe esan dezakegu ordurarteko errepresio paradigma finkatu nahi zutela, tratu zikinetatik kanpo geratuko ziren euskal preso politikoen garbiketa egiteko asmoarekin.

Fernando Arburuak arrazoien bila astindu du ganbara, egoera politikoaren konplexutasunari arreta jarriaz:

> *Dimentsio politikoari dagokionez, ez da erraza jakitea zerk eragin zuen Carabanchelgo ETAko presoak justu une hartan Puertora bidaltzea. Zurrumurruak baziren, bezperan ere jakin genuen*

*biharamunean-edo mugituko gintuztela, baina auskalo zer adierazi nahi izan zuten neurri horrekin. Artean, UCD zegoen gobernatzen, preso politikook bi espetxetan funtsean bilduak ginen (Soria eta Carabanchel) eta Erakundea kaña banatzen ari zen etengabe. Baliteke ere presoen kopuruagatik izatea: Soria eta Carabanchel nahiko beteta zeuden eta atxiloketa kopuruak gora egin zezakeen edozein momentuan; beraz, espetxe berri bat beharko zuten denak sartzeko. Baina hau dena espekulazioa besterik ez da. Hori bai, ez dut uste kasualitatea izan zela mota horretako erregimena zuen espetxea aukeratzea guretzako. Gainera, espetxea ireki berria zen eta hutsik zegoen: ondorioz, guretzako espreski pentsatua zegoela pentsa daiteke.*

Puerton sarturiko kideen bizi-baldintzak eta ezarri zitzaien errejimenaren deskribapen soila pista argiak dira gibelasmoa baieztatzeko: sekuritate gorena, hormigoizko horma-hilobien laguntzaz erdiesten da. Sarraskirako fasean lehen espetxe-ikurra izan zen Puertokoa.

## **Gartzelako** *pasarte bat*

Puerto de Santa Mariako gartzelaraino heldu da ama, aspaldian preso den semea bisitatzera. Trenez, bi eguneko bidaia astuna izan da. Sartzeaz batera abisatu diote semea zigortuta dagoela, bost minutuko bisita besterik ez duela. Sartzeaz batera metaldetektorea pasatu behar izan du funtzionarioen aurrean, lauzpabost bider pasatu behar izan du metaldetektorearen paretik bisitetara sartzeko baimena jaso arte. Bisita kabinara ailegatzean funtzionarioak esan dio:

- *Si hablan en vasco se interrumpe la comunicación.*

Zain egon da apur batean. Orduan semea ailegatu da, argala, ilea motz-motza, beltzarana, hala ere irribarrez. Eseri orduko, eskua atzamarrak zabalduta ipini du kristalaren kontra, amak entzun ez duen zeozer esan du mutikoak. Funtzionarioak ez du oraindik ahotsa alde batetik bestera pasa dadin sakatu behar duen interruptorea sakatu.

- *Etxean zer moduz, ama?*

Orain bai, entzun du:

- *Ondo, oso ondo...*

Eta mutilaren ezpainei begira geratu da, mugitzen ari dira, baina ez du deus entzuten.

- *Queda interrumpida la comunicación por hablar en vasco.*

Mutilak atzamarrak zabaldu ditu berriro kristalaren kontra, amak eskua eman nahi dio, kristal lau eta hotza besterik ez du ukitu kristalean...
Bi funtzionario etorri dira semearen bila, eraman dute, atzerunzka begira joan da. Ama, begitik malko lodi bat dariola geratu da kanpoaldeko funtzionarioen zain.

Joseba Sarrionandia

Euskal presoak bi modulotan banatu zituzten, muturreko errejimen baten pean. Inoiz ezagutu gabe zituzten arau eta baldintza berriak zituen Puertok, besteak beste, euskarazko bisitak debekatzea, kontaketetarako ilaratan formatu behar izatea edota, ziegako leihoa burni xafla batez estalita egotea. Zigorrak edozein arrazoia argudiatuta zeuzkaten eta iritsi zirenetik bost eguna igarota, hogei preso zeuden zigor zeldetan. Tentsio larria zegoen, eta nahiaren eta ezinaren arteko tenkak markatzen zituen egunak. Horrela dauka gogoan Jose Antonio Torre Altonaga *Medius*-ek:

> *Hara iristean ordurarte ezagutzen ez nituen zigor ziegatara eraman ninduten estreinakoz; edozer aitzakia zela eta hara gindoazen, eta bere gogorrean, egoera haren inguruan sentsibilitate eta elkartasun arras handiak piztu ziren gure artean.*

Funtzionarioen aldetik, egundoko jazarpena jasaten zuten kideek. Izan ere, kartzelari asko faxista porrokatuak, guardia zibil ohiak, torturatazaile zigortuak edota zurrutero nekagaitzak ziren, eta arazo andana sortzen zituzten. Kantatzea, txistu egitea, kartzelariaren aurpegira begiratzea, konketan ile bat aurkitzea..., gaztigua jasotzeko ez zegoen mugarik, eta zakurrak euskal preso politikoen zain, beti atezuan zeuden. Adi eta amorraturik, noiz eta nolatan izorratuko. Gure Kolektiboaren memoria kolektiboan betiko geratu dira horietako askoren izena eta, batez ere, beren goitizenak: Zapatones, Tragasables, Argüelles, Carrasco, Kaskagorri, Topolino, Lepomotz,... Zein baino zein okerragoa. Dena dela, guztien artean burua altxatzen zuenetako bat *Tragasables* zen. Horrelako ezizena jarri genion Miguel Angel Rodríguez benetako izena zuen morroi purtzilari, xelebreak eta neurri ororen kanpokoa baitzen bere jokabidea. Hogei urte luze pasata, Algeciraseko zuzendaria izanik, kargugabetu zuten dirua lapurtzeagatik.

Zapatones, Topolino eta beste batzuk oraindik daude Puertoko moduloetan uniforme urdina jantzita. Ogibide tristea, presoak torturatzen eta bazterrak nahasten jarraitzen dute egun; Joxean Agirre donostiarrak azpimarratzen duen bezala:

> *Kasta berezikoak dira horiek. Edozer dela eta lepoan genituen, probokazioetan, lasaitasun izpirik egon ez zedin bere esku zegoen guztia emanez eta emanez. Zapatones-ek sen berezia zuen, bere eskasian, istiluak sortzeko, ezer ez zegoenetik arazoak sortzeko eta, oro har, preso guztiak asaldatzeko. Akonplejatu hutsa, besteen ezbeharretik urre gorria aterako zuela pentsatuko luke, beharbada, baina hor jarraitzen du, zaharrago, burua soildurik eta beti bezain garraztuta, preso bera ere Puertoko gurpil zoroan.*




***Euskal preso politikoek egindako idazlanak eta olerkiak biltzen zituen liburuaren azala.***

Ehunka ziren Puertoko errejimenari aurre egiteko arrazoiak, baina presoen artean sentsibleenak bi ziren: senideek jasan behar zuten egoera, alde batetik, eta zigor-epeak pasatzeko kartzela hartan egokitu zuten isolamenduzko modulua bestetik; usategia deitzen genuena, alegia.

Haraino ailegatzeko, hirugarren solairurako eskailerak igo behar genituen, kartzelako kupula mehatxugarriaren azpian zegoen-eta izuikararen ganbara. Bertan ikusi, entzun eta pasarazikoak deskribaezinak dira. Hainbeste ziren non, 1983. urtean Intxaur azal baten barruan izeneko idazlan kolektiboan kontatzen baitziren euskal preso politikoek bertan emaniko lehen hamabi orduak. Mespretxua eta laidoan iaioak, zigor-modulo hartan jaun eta jabe jarduten zuten lehen aipatutako basapiztiak. Ohiko bisitaria zen Iñaki Ojeda Txapel, poliziak 1984an Gurutzetan erail zuen gudaria, eta ziega haietako argi eskasarekin idatzi zituen olerkirik hunkigarrienak.

## **No** *me callarán*

*El día que se acabe*
*la tinta de mi pluma*
*escribiré con mi sangre,*
*la usaré en el papel.*

*Cuando se me acabe*
*el papel*
*escribiré la sangre*
*sobre mi carne*
*Pero nunca me callarán.*



Berak aurkitu zuen kartzelarien harrokeria zilipurdikatzeko modu eraginkorra. Begizulotik behatzen topatuz gero, lotsarazten zituen lizunkeriak eginez, edota, azeri-azeri, horren zorrotz zaintzen zuten idazkien kariaz, adarra jotze franko egiten zien: ezustean bezala, erortzen uzten zuen bere patrikatik ondo bildutiko paper txikia. Presoen arteko barne komunikaziorako mezu bat harrapatzeko ustearekin funtzionarioa korrika etorri, lurretik jaso eta, zabaltzerakoan, zera irakurtzen zuen lelo aurpegiarekin: "izorra hadi, ergel halakoa!". Txapel usategira zihoan segituan,... baina irribarrea ezpainetan.

Senideen bidaiak, alimalekoak izateaz gain, alferrikakoak ziren sarri askotan. Atxilotu egin zituzten kartzelako ateetan, edota bisita bertan behera utzi inolako azalpenik eman gabe. Eta beharbada okerrena zen, zigorturik egonda, soilik bost minutuz lokutorioetan egon ahal izatea. Garai hartan zailagoa zen haraino joatea. Garraioabideak ez ziren berdinak, eta lanorduetan bidaiatzen zuten sarri. Sofrikario itzela zuten, eta gainera bisita geldiarazten zuten hitz bakar bat euskaraz esateagatik, gutunekin egiten zutenaren antzera: *kaixo!* diosal xume bat nahiko motibo bazen eskutitza igorleari bueltan bidaltzeko. Senideen inguruabarra gatazkak markatuta dagoela jakin arren, sentiberatasuna ezin daiteke alde batera utzi haiek ankerki tratatzen dituztenean.

## **Gosea arma,** *garaipena helburu*

Egoerari amaiera emateko deliberamendu irmoa hartua zuen Kolektiboak, eta, lehen liskar inprobisatuak gainditu eta gero, borrokari ekin zion. Abuztuaren 24an lehen aldiz egin zuten gose greba, Puerton hasi eta Carabanchel, Soria eta Yeserías-en bat eginik burutua. Protestaldi hartako eskabideak, kartzela barruko arazoak aintzat harturik, biziraupenarekin lotu ziren nagusiki, bertako presoek 83ko irailean datatufurther agiri batean onartzen zuten legez:

> *Lehen greba harekin hasierako kaosa gainditu nahi izan genuen, eta egoerari dramatismoa kentzeko ahalegin antolatua izan zen. Estrainakoz, erreibindikazio jakin batzuei eman genien lehentasuna, Puertoko errepresioaren dimentsioak kartzela hartatik irtetzea exijitzen baitzuen. Honekin batera, "Puerto apurtu" lelopean herri mobilizazio ugari zegoen, beraz, gurea ez zen ekimen isolatua. Azken finean, gure eskakizunek tupust egiten zuten administrazioaren jarrerarekin, "preso bereziak" bezala tratatzen gintuzten-eta.*

Kolpe harekin, beraz, bereiz-marra markatu zen, bere kideak edonon kolpatuta izanda, Kolektiboaren erantzuna bateratua izango zela ikustarazteko.

Baina ez zen nahikoa izan, eguneroko bizimoduak barruko legeen makurrean itzulika jarraitzen baitzuen. Animoa oso-osorik, euskal preso politikoak indarra bildu eta hurrengo zafraldia prestatzen hasi ziren. Ziur zeuden garaipenaz, baina Bigarren Mundu Gerratean sobietarren etsaiei gertatu bezala, *Negu Generalak* ezarri zuen bere lege zitala.

1981. urtean bere azkenetan zegoela, abenduaren 12an gose greban jarri ziren Puertoko presoak. Jarraian, beste espetxeetakoak ere gehitu ziren borroka hartara. Guztira, 176 kidek hartu zuten parte, helburu zehatza zutelarik: Amnistiaren aldeko batzordeekin batera, Amnistiaren inguruko indar metaketa eta herri mobilizazioak sustatzen ahalegindu ginen. Labur esanda, KAS alternatiba taktikoren inguruan aukera rupturistaren premia eta posizioa aitzinatu nahi genuen borroka haren laguntzaz.

Edozein kasutan ere, Cadizeko kostaldea ez da turistentzako opor-gidetan iragartzen den bezain epela eta gozoa. Neguetan, hotza, haizetsua eta hezea dugu Rotako bidean zut ezarri zuten presondegi madarikatua, eta larrutik ordaindu zituzten euskal preso politikoek 37 egunez luzatu zen bigarren gose grebaren ondorioak. Fernando Arburua Zugarramurdikoa da, eta neguro daukate inguru horietan hotzaren berri, baina kutsu berezia zuen, antza denez, Puertoko hotzak:

> *Egia da neguak markatu zuela gose greba hau. Gosez, hotza, euria, haizea…eta ura besterik ezin sartu. Ezinezkoa zen berotzea (Puerton ez da sekula berogailurik egon) eta hotz benetazkoa zen, nahiz eta Andaluzian egon. Ohera jantzita eta galtzerdiekin sartu behar zen, hotzak ez akabatzeko, orduan ez baitzeuden pluma, koltxa bero, plumifero edo antzekorik. Nik borroka osoa ziegan pasatzea erabaki nuen. Aukera zegoen ziegan geratzeko, eta ohetik ez nintzen ia mugitzen ere… bisitetara joateko ez bada. Pertsonalki ez dut oroitzapen txarregirik, esan nahi dut, txar guztiek badute alde ona. Izan ere, egun osoa ohean pasatzeaz gain, irakurtzeko grina handia sortu zitzaidan eta azken eguna arte gogo handiz ibili nintzen liburuak irakurri eta irakurri: buruak irakurritakoa asimilatzeko gaitasun ikaragarria zuen.*

Goizeko zazpiretan sirena hots karrankari batek apurtzen zuen presoen loaldia, eta zortzietarako patioan zeuden ziegan geratzen ez ziren beste guztiak, izotza, euria edo ekaitza egon. Ekialdeko haizeak jotzen zuenenean are okerrago, bertoko bitxikeria atmosferiko hura edonor erotzeko modukoa delako. Noraino iritsiko den bere eragina, non Cadizeko epaitegiko hainbat ebazpenetan haizeak ekialdetik jotzea ardura penal eta zigorren aringarri gisa dagoela jasoa. Zakarra eta indartsua, buruko mina sortzen du erraz, baina okerrena bere iraupena da: egunak eta egunak jarraian astintzen ditu-eta bai arrantzaleen txalupak, bai -geurera itzuliz- euskal preso politikoen ganbara eta zangoak.

Goseak ahulduta, egun osoa patioan egotea oso gogorra zen, eta are gogorragoa negu gorri hartan, zaparradaz zaparrada, beti hotz eta blai ematen zutela eguna. Hala eta guztiz ere, irabazteko ustea osoa zuten burkideek, eta kalea ere borborrean zegoen, Espainian Futbol Mundialak eta Aita Santuaren bisita baten bezperetan geundela, ahaleginak eta bost ari ziren egiten Euskal Herrian.

Tankera horretan egon ziren hogeita hamazazpi egun, baina egoera ez zen leundu, eta Amnistiaren helburua ez zegoen eskuragarriago 1982ko urtarrilan, gose greba bertan behera utzi zutenean. Hura gutxi balitz, medikoen aldetik izan zuten osasun-laguntza lotsagarria izan zen. Gose greba ondorengo asteek arta berezikoak behar duten izan, liseritze sistema atrofiatzen baita jarduera ezagatik, eta elikadura desegokiak kalte handiak sor ditzake organismoan. Horratik, dieta biguna jartzea izaten da lehen neurri medikua.

Puerton ez, ordea. Errekuperaziorako, arrantxo ustela besterik ez zuten izan euskal preso politikoek. Asko jota, kartzelako ekonomatoan salgai zeuden lataren bat izan zuten eskuragarri, baina hainbat okerrago, saltsa biziak eta jaki liserigaitzak baitzeuzkaten. Beherakoak, odoluz-

kiak, gastroenteritisak eta sukar episodio luzeak izan ziren goseak agindutako neurrigabekeria haien uzta. Sendagilea gainerako kartzelarien larru berekoa zen; estrategia bereko pieza, nahiz eta bata zuri bat soinean jantzita eraman.

## **Karramarro** *uhartea*

Urte berria, 1982, Franco hil zenetik euskal preso politiko kopururik handiena zuela hasi zen: 435 ohe huts Euskal Herriko etxeetan. Hamabi hilabeteren buruan bikoiztu egin zen presoen zerrenda, gobernuak abiaturiko errepresio izugarriak eskuharea pasatzen baitzuen, herriz herri eta etengabe. Estatuaren eskupera egoteagatik, ETAko presoak ziren errepresio giltzarik gertukoena. Ezker abertzale osoa jipoitzeko buruturiko edozein neurrik kartzela zuen lehen eszenatoki, eta Kolektiboari ezartzen zitzaion dena emanda. Modu berean, estatuaren estrategiaren makurguneetan -eta asko izan zituen urte haietan- presioa eta mendekua areagotzen ziren kartzelan. Miguel Castells abokatuak elkarrizketa batean adierazi zuen bezala, "presoak objektuak edo tresna hutsa dira, fitxa bizigabeak balira tratatuak, eta bankak, aurkaria garaitu guran zuzentzen duen herio-partida honetan, nahieran barajatu, mugitu edo metatzen dituenak". Baina, *"E pur si muove"*..., esan genezake.

Gose garaia ez zen gainditu, aldiz, protestaldien amaierarekin. Janari guztiz eskasa zen Puertokoa. Presoon bizkarrezurra zuzentzeko formalki arautu gabeko neurria edota administratzaile lapur baten ekarpen interesatua, berdin zitzaigun. Emaitza bera zen: besteen diru goseak, tripazorriak, kili-kilia eragiten zigun urdailean.

Eta batzuetan, dena den, otorduaren truke bizkarra makurtarazteko bide zuzena, lehen moduloan eta zigor zeldetako janaria banaketan, karramarroa ireki gabe, azpila beheko arrailduratik pasatzea zen. Bai, Puertoko barne arkitekturaren bereizgarri gisakoak ziren karramarroak. Izen horrekin ezagutzen ditugu ziegako ate nagusiari erantsitako kaiola modukoak. Burnizko barrez eginak, sekuritatezko espazio bat uzten dute presoa eta kartzelarien artean, bertatik bertara mintzatuz ere, ezinezkoa egiten du kontaktu fisikoa.

Presoen arteko giroa, egia esateko, ezin hobea zen. Aspalditik, batzarra zen gune erabakikorra, baina haratago zihoan bere garrantzia: Kolektiboaren identifikazio ikurra ere bazen, kontu txikiak zein handiak bertan eztabaidatu eta finkatzeaz gain, kordoi sanitario bat suposatzen zen etsaiarentzat. Nor bere kasa ibiltzea nahi zuten garai hartan bereziki, gizabanakoren gainean subjektu kolektibo sendoa eratzea izugarrizko eragina izan zuelako.

Den-dena tratatzen da batzarrean, eta noizbehinka bertan hitz egindakoa astuna edo aspergarria norbaiti gerta badakiokeen ere, hori da espetxe sistema eta euskal preso politikoen kolektiboaren artean guk ezartzen dugun sekuritate gunea: asimilatu nahi gaituen araudiari bidea ixteko jarri diogun gure karramarroa. Patioaren erdian zirkulu bat osatzen dugunean, kartzelariak badaki esparru irazgaitza dela, kolektibotasunak ematen digun harrotasunaren biribil hori ezin duela zeharkatu. Batzar bakoitzean birrintzen dugu estatuaren kartzela estrategia.



***Puertoko patioan batzarra egin bitarteko unea.***

Nortasun kolektiboa gordetzeko ez ezik, gure erabakien inguruko garapena bermatzeko ere balio du batzarrak. Edozein planteamendu ezbaian egon daiteke, iritzi eta botu guztien balioa berbera da, eta hitza hartzeko eskua altxatzea da baldintza bakarra. Beraz, erabakiguneak duen funtzionamoldea guztiz demokratikoa da. Hori bai, hartutako erabakiak lotesleak dira kide guztiontzat, eztabaida fasean jarrera bat edo bestea defendatuta ere. Hori da Kolektiboraren urrezko araua: eskubideekin batera betebeharren artean gehien identifikatzen gaituena. Aldez edo moldez, Erreformaren aurreko garaiko komuna ezberdinetan ere modu horretan askatzen zen burubideen korapiloa, baina Euskal Preso Politikoen Kolektiboaren ibilbidean batzarra finkatu zen bidatz-orritzat bere lehen urratsetatik. Eztabaida kolektiboan denak du lekua; erabakimen kolektiboan gehiengoaren aburuak xedatzen du ekinbidea.

## **Eltxoen izurritea** *baino neketsuagoa*

Gobernuak tinko jarraitzen zuen. Areago, goian zerua eta behean lurra geundela pentsatzen zuen, ondo baino hobeto batzihoakion EE eta ETA (pm)-ko goi arduradunekin zeukan hartu-emana. Horren erakusle, martxoan Carabancheletik Puertora beste hogeita hamar kide eraman zituztela.

Eguraldi onarekin itzuli ziren eltxoak Puertoko patio eta ziegetara. Inguruko lupetzetan gizenduta, eltxo izurrite jasangaitza pairatzen genuen urtean zehar, baina batez ere, eguzki galdatan. Zomorroek estimu handitan daukate presondegia, giza haragia barra-barra daukate eta ihesbiderik ezari esker ehiza-barruti errepikaezina omen. Haiek etorri eta gu, esker txarrekoak, berriz ere hanka egiteko irrikitan. Izan ere, urte hasieran hutsik zegoen Carabanchelgo ziega batean bi pistola atzeman ondoren, beste ihesaldi saiakera bat zapuztu zuten kartzelariek martxoan.

Urtebete lehenago, Madrilen poliziak egindako sarekada batek hutsaldu zuen espetxe bera asaltatzeko asmoa. Baina, tematiak gara gero! Maiatzan hogei metroko luzaera zuen tunel bat topatu zuten kartzelariek, eta hiru kide eraman zituzten zigor zeldara. José María Reparaz *Dina,* José Luis Flores eta Angel Erdozia *Iko* kideen bizkar gainean erori zen saiakeraren erantzukizuna.

Aurkitu zituzten zuloak eta, arrazoi ezberdinengatik, bere horretan geratu ziren beste saiakuntzak aintzakotzat hartzen baldin badira, euskal preso politikoek poltsikoak bete lan zihardutela begi-bistako da. Eta behin bederen, behatz-puntaz ikutu zuten askabidea, kalerako jantzita zegoen talde batek buelta eman eta Aluche auzoko espetxe kankailu hartako hirugarren galeriara itzuli behar izan baitzuen, estolda galeriak korridore moduan erabiliz, kaletik gertu egon eta guzti. Eltxoak kaskagorrak baldin baziren, ez ziren atzean geratzen euskal preso politikoak.

Poli-mili gutxi batzuen irteera oso bestelakoa izaten ari zen, aitzitik. Motel eta tarrapataka, baina indultoen bidez lehen kaleratzeak egin zituen UCDk. Uztailean, berriz, Soria eta Langraitzerantz zeramatzaten bi mili eta bi poli-mili balaz zauritu zituen Guardia Zibilak lekualdatze batean. Furgoiaren gurpila zulatu zen, eta eragindako zaratak ikaraturik, pikoleto batek tiro egin zien. Luis Olivares, Alejandro Barbarin, Juan Karlos Uriarte eta Santiago Rezola ohatilan sartu ziren Guadalajarako hospitalean. Barbarin kinka larrian.

Eta gerra-zirimola amaierarik ez zuela egiaztatzeko edo, Sorian zeuden 153 preso Alcalá Mecora eraman zituzten abuztuan. Estatuak, Alemaniatik inportatu zituen isolamendu eta sarraski teknika modernoak frogatzeko hersgune berria egokitu zuen. Sekuritate gorena lortzeko hilobiak diseinatu eta eraiki ondoren, euskal matxinoez betetzea zen hurrengo urratsa.

Irailaren 29an zerrenda madarikatu bati eman zitzaion hasiera. Alabaina, beren neba Auzitegi

Nazionalean epaitzen zutelako, Madrilera joan ziren Rosa eta Arantza Amezaga.  Tolosara itzultzen ari zirela kotxe istripuan hil ziren bi ahizpak Aranda del Dueron. Koldok, haien anaia, ziega barruan jaso zuen abistearen kolpea, eta orduz geroztik errepidea lurralde minatu gisa ikusten ikasi genuen.

Ordurako, UCDren barne krisiak eta Leopoldo Calvo Sotelo espainiar presidentearen ahuleziak aro berri baten atarian jarriko gintuztela agerikoa zen hartan, Puerto, Yeserías, Carabanchel eta ireki berria zegoen Alcalá-Mecoko euskal preso politikoek borroka berri bat abiatu zuten. Berezko ekarpena egin nahi izan zuten, alternatiba bakarra zen PSOE alderdiaren joku-zelaia baliza argiekin mugatzeko. Izan ere, protestadi hura  "testuinguru politiko orokorrean zegoen txertatuta, KAS alternatibaren bost puntuak eta herritarren batasunaren sendotzea helburua zela". Izaera eta mami guztiz politikoa zuen gose greba hura oso baldintza kaskarretan burutu zen, espetxe frontean Kolektiboa suntsitzeko molde guzti-guztiak entseatzen ari baitziren, eta egoerak higatzen zituen bi euskarri garrantzitsu: pazientzia eta osasuna.

Mecon eta Yeseríasen hospitalera eraman behar izan zituzten hainbat kide, eta Puertoko batzarrak publikoki txarretsi zuen bertoko medikuaren jarrera. Bere zereginei muzin egin eta artatze lana alde batera utzi izana leporatzen zioten presoek Alfredo Jorge Suar Muro sendagileari. Kalean, bestalde, Amnistiaren aldeko Batzordeek bultzatu zuten mobilizazio dinamikak errepresio gorria jaso zuen, baina ez zuen gainbehera egin. Urriaren 28an, jada garaile, Felipe Gonzalez eta Alfonso Guerra kalean bildutako zaleak agurtzen hasi ziren gau hartan, gauzak aldatuko zirela pentsatu nahi izan zuten euskal preso politikoek. Ez zen posible aurreko erregimenarekin loturak ez zituzten gobernari berriak lehengo lepotik burua izatea. Eta, jakin gabe, arrazoi zuten. PSOEk aurrekoek egiteko adorea izan ez zutena ere egin zuten-eta. Erruz egin gainera.

Badaezpada ere, gau hartantxe amaitutzat eman zuten gose greba. Azken honetan hogeita hamabi egun baraurik egon ziren, baina, beharbada, besterik egin behar ez izateko itxaropen izpi bat errotuta heldu zioten sabela piskanaka betetzeko lan atseginari.



***Alcala-ko kartzelako korridoreetako bat.***

Bitartean, hamarka kidek ahal moduan egiten zioten aurre Alcalá-Mecon aurkitu zuten egoerari. Hamabost egun lehenago inauguratu zuten espetxe hartara Soriako preso guztiak eraman zituzten, eta berehala jabetu

ziren eraikin haren hormek beraientzat gordetzen zuten halabehar zitalaz. Espetxetik irten berriak zirela, horrela deskribatzen zuten kartzela berria Juan Mari Olano eta Maximo Aierbe goierritarrek:

> *Lehen begiradan horren gogorra ematen ez badu ere, ... zerbait berezia dauka Alcalako presondegiak. Izan ere, okrez margotutako mintzalekuak izan ezik, beste guztia berde eta txuria da. Gu horretaz konturatu ala ez, ikusmenean eragina izango du halako kolore bizigabeak besterik ez ikusteak. Horrez gain, ziega barruan dena dago lurrerra itsatsita, aulkia salbu. Halaber, berrogeita hamar metro jarraian ibiltzeko modurik ez dago, topeak nonahi baitaude. Soria ere txikia zen, baina Alcalán beste baten barruan dagoen kaiola batean sarturik sentitzen zara. Espetxeko barne egitura halakoxea da, jakina. Prefabrikatutako blokez eginda, moduloak berdin-berdinak dira, eta errealitate horrek adoregabetzen zaitu ezinbestean, ezertarako gogoa galtzen duzu-eta, psikikoki eraginda. Zaila da zehaztea zer duen espetxe horrek, baina definigaitza den zerbait badu. Azken finean, argi dago presoa psikikoki suntsitzeko egina dagoela.*

"Kartzelatze zelularra" deitzen zioten Alemanian eredu berriari, RAFeko (Rote Armee Fraktion) presoekin azken bururaino eraman zuten birrintze sistema ezarri nahi izan baitzuten Espainiako *demokrazia gaztea*-n. Armada Gorriaren Frakzioko militanteek pairatu zuten espetxe politika aplikatu nahi ziguten Mecon: neurri laidogarriak, jipoiak eta sarraskiak.



***Andreas Baader, Gudrun Ensslin, Ulrike Meinhof, Ingrid Schubert eta Jan-Carl Raspe, kartzelan erahildako RAfeko kideak.***

Alemaniako Stammheim bezalako presondegietako barne arauak ez ziren kartzelako zuzendariek hartuak, Gobernuak eta epaileek baizik. Inkomunikazio teknikak findu ziren, eta Armada Gorriaren Frakzioa erakunde iraultzailearen Andreas Baader, Gudrun Ensslin, Ulrike Meinhof, Jan-Carl Raspe eta Ingrid Schubert militanteak hil zituzten, batzuk zuzenenan garbitu eta bestetzuk beren burua beste egin zezaten lan izkutua eginez. Geurean, beste horrenbeste egiten saiatu ziren, baiano oztopo franko aurkitu zuten, preso kopuruarena bat zelarik. Militante gutxi batzuekin bideragarria dena, ezin baita praktikara eraman espetxe bakar batean bertan ehunda berrogeita hamar kide baldin badaude. Sakabanaketaren ideiak bor-bor egiten zuen agintari berrien buruan, baina baldintza egokien zain zeuden.

Yeserías-en, bestaldetik, eredu berbera lehenetsi zen emakumezko euskal preso politikoak mendean hartzeko. Emakume presoek zama bikoitza daramate euren bizkarretan, preso izatearena eta emakumea izatearena, hau da, jendarteko emakumearen rolak apurtu izanarena. Horretaz gain ordea, espetxe zigorra are latzagoa bilakatzen duen beste faktore bat ere badago, aski ezaguna gainera; euskaldun izatea. Euskal Herrian ehunka izan dira terrorismo delitua egotzita Euskal Herriaren alde borrokatzeagatik bi estatuen espetxeetan egon diren emakumeak, eta gehienetan gizonezko militanteenak baino hagitz gogorragoak izan dira kartzelaldiaren bizi-baldintzak.

PSOEk Moncloara iritsi zen urte hartakoak nolakoak ziren jakiteko, Itziar Galardi oiartzuarraren testigantza oso egokia da:

> *PSOEk irabazi zituen hauteskundeak eta kanpainan saldu zuten leloa ,"La imagen del cambio", neurri batean izan zuen bere isla, nolabait esatearren, espetxetako irudia hobetu nahi izan zuten. Eta egia da hainbat gauzetan nabaritu zirela aldaketa txikiak: lagunekin bisean bisekoak , bisean bisekoak gauzatzeko gela berria egokitu zuten, hilabetean bi dei, baita ere lortu genuen zeramikako tailerrera joatea, ikastaro desberdinak hasi ziren, besteak beste astrologia, marrazkigintza, eta antzerki zuzendari zen Juan Margallok antzerkigintzako klaseak eman zizkigun, ikasketak burutzeko aukera ere izan genuen, nahiz eta praktikan zailtasun ugari jarri,... Baina horixe, axaleko itxura aldaketak baino ez ziren izan, zeren eta irudi hori saltzen zuten bitartean, euskal errepresaliatu eta orohar nazio askapenerako mugimenduaren aurka neurri zorrotzak, bortitzak planifikatzen ari ziren: gerra zikina, GAL, Herrera de la Manchako erregimen militarizatua .... eta emakume preso politikentzako zaharberritutako espetxe errejimenaren estutzea .*



**Yeserías 1983. Zutik ezkerretik hasita: Celina Lacombe, Maite Ortiz de Zarate, Koro Egibar, Miren Egaña, Maria Luisa Guenetxea, Gloria Rekarte. Eserita, ezkerretik eskubira: Itziar Galardi, Gemma Telletxea, Ana Gerenebarrena, Mari Karmen Jimenez eta Jone Bernaras.**

Sozialisten estilo-liburuaren gutiziak frogatzeko ezer gutxi itxaron behar izan genuen Alcalá-

Mecon, bai horixe! Kalefakzioa ez zebilela-eta, euskal preso politikoen ordezkariek bertoko zuzendariarekin elkarrizketa bat lortzeko esperantzarekin modulo sarreran egonik, Polizia Nazionalaren sarraldi basatia jazo zen 1982ko abenduaren 2an. Batzartuta zeuden kideak jipoitu eta galeriaz galeria, ziegaz ziega jazarri zituzten, harik eta banan banan makilkatu zituzten arte. Kartzelari batzuk, korrika zihoazen presoak zangotrabatzen zituzten beren kautan, polizien porrakadak lurrean zeudela jaso ahal izateko. Maiatzaren 23an errepikatu zen beste sarraskia hirugarren moduloan, eta nahiz eta sasoi berean EGINeko kazetariek Meco, Puerto eta Yeserías-eko espetxeetako ateak irekita topatu zituzten erreportaia bana egiteko, PSOEko kartzela politikaren ñabardurak ordurarte ezagututako gidoitik milimetro bat bera ere ez ziren aldendu.

1983ko urriaren 14an, ETAk ekinaren ekinez ireki zuen espetxe frontea, eta aski ezaguna zen Puertoko medikua exekutatu zuen. Gobernuaren nahasmendua erabatekoa zen, eta erakundeak ekintza bere gain hartu baino lehenago hiru bertsio ezberdin zabaldu zituen iturri ofizialetik: preso sozial baten mendekuarena, gaizkileen arteko kontu-garbitzearena eta, droga aferatan nahastuta egotearena. Elementu ederra Alfredo Jorge Suar zelakoa!

Labur beharrez, hiru dira epealdi honetan estatuaren estrategian sustatzen diren kartzela politikaren zertzelada errepresiboak. Lehenik eta behin, Soriako experientzia alde batera utzita, Justizia ministroa eta Kartzela Zuzendari Nagusia izango dira estrategia betearaziko dutenak, polizia kartzeleetaik atera eta kartzelarien protagonismoa indartuz. Bestetik, espetxe araudia eta sailkapena irizpide murrizgarrien arabera erreformatzen dira, zigorra laburtu ez eta bizimodua bera ere samurtzeko edozein aukera zapuzteko asmoarekin. Azken batean, aurreko bi aldaketek hirugarrena tresnatu nahi dute, alegia, bizi-baldintzen gogortzearekin damutze eta errenditze prozesua abaiarazi nahi zuten. *Birgizarteratze Politika* oso erabilia izan zen errepresio-erretorikan, baina praktikan jorratzen zenean Ezker Abertzale osoa kikildu eta *status quo*-ren artegian sarrarazi nahi zuten. Kolektiboan pitzadurak sortu, eta horren kosto politikoa ETAri eta haustura zein independentzia aldarrikatzen zituzten sektorei ordainarazi.

Kale egin zuten, eta porrot ikaragarri haren arrazoien artean euskal preso politikoek bi arlotan erakutsi zuten irmotasuna aipatu beharra dago: KAS alternatiba eta negoziazio estrategia sustatzeko kalearekin egindako elkarlan politikoa, eta, biziraupen helburu, Kolektiboak bere burua defendatzeko sekuritate goreneko kartzeletan beren eskubideen alde burutu zuen borroka etengabea. Norabide horretan bai gose, bai komunikazio-grebak egiteaz gain, zain mozketa masiboak eta ekintza zuzena erabili zituzten.

Kolektiboaren jarraibide politikoa mugatzeko, hauxek lirateke hainbat adibide: 78ko amnistiaren aldeko asteei emaniko babesa; CGVri emandako ate-danbatekoa; Konstituzioa eta Estatutua publikoki errefusatzea; Iñaki Pikabea parlamentari-akta lortzea, Amnistiaren aldeko Batzordeei sostengua eman eta polimilien hondaketa-prozesua salatzea; amnistiaren alde eta lege antiterrorista arbuiatzeko egindako gose grebak; bizi-baldintza duinak lortzeko borrokaldiak.

# Hirugarren epealdia

## 1984-1986



*Isolamendurik latzena*
*medio lortuko dugu*
*sekuritate gorena*

Andrés Márquez Aranda,
PSOEk izendatu zuen Espetxe Zuzendari Nagusia,
1985ean.

## **Luze** *begiratzen hasiak*

Etsipenik gabe, etorkizuna beste era batera ikusteko garaia zen, jakina. Indultoa eta geroko abagune ezberdinetan, haustura demokratikoa eta, horrekin batera, askatasun demokratikoak eta amnistiak eskuragarri zirela zirudien. Epe laburrean lortuko zirela uste zabala zegoen, baita Kolektiboan ere.

Ziklo autonomiko ustelaren hasierak eta PSOEren etorrerak, ordea, epeen inguruko pertzepzioa aldarazi ziguten. Izan ere, PNV-PSOE bikoteak aliantza izenpetua, aldi gogorra eta luzea zetorrela barneratzera eraman baikintuen. Maximo Aierbek halaxe gogoratzen du perspektibaren aldaketa:

> *Jendea kartzelan sartu ahala, denbora gehiago generamanei antzeko gauzak galdetzen ziguten: bizimoduaz, harremanez, Kolektiboren funtzionamoldeez, eta, kasu askotan, negoziazio politikoaren gaineko iritziaz. Guk, beteranoek, sartu berriei modu bertsuan erantzuten genien balizko negoziazio eta konpontze prozesu bati zegokionez: "suerte handia izan duzu, motel. Bi urte barru denok kalean gaude-eta". Beti bi urte beranduxeago, ateri ala goibel, udaran edo neguan, berdin. Nolabait, psikolojikoki egoerari gogor egiteko balio zuelako, eta, era berean, gauzak epe motzean bideratuko zirelakoan geundelako. Piskanaka ikuspegia hori baztertzen joan ginen, nabari zen-eta estatua gotortuta zegoela bere posizioan. Amnistia eskuratzea luzarorako joango zela barneratu genuen, baina itomenik gabe jarraitu genuen aurrera.*

Kide batzuek bost urte bazeramatzen preso Herrera de la Manchako kartzelara eraman zituztenean. Espetxe haren aurrekariak beldurgarriak ziren, GRAPO-koak, preso sozialak eta gure kide batzuen ezagupidetik ikasitakoak ez baitzuen zalantza arrastorik uzten: jendea txikitzeko gunea zen Manzanares *(Ciudad Real)* herritik hamasei kilometroetara zegoen kartzela.

Berez, 1979. urtean ireki zuten, eta berehala bihurtu zen errepresioaren ikur. Presoen torturagune erraldoia zen hartan, sarrera-gelan bertantxe hasten zen tormentua. Han, biluztarazi, hankaperatu, mehatxatu eta, gehienetan, jipoitu egiten zituzten burua makurtzen ez zuten preso sozialak. Norbere espedientean *erreboltaria* edo *menderakaitza* gisako oharpena ekarriz gero, Herrerako kartzelarien gerra-jostailu gisa izaten zen tratatua.



***Santiago MArtinez Motos, Herrerako torturatzaile-burua.***

Horren latzak izan ziren tratu txarrak, non zuzendaria eta hamaika funtzionario auzipetu zituzten. Guztien buru Santiago Martínez Motos zuzendaria zen. Eta epaitegi-aulkian José Antonio Barroso eta Manuel Arcilla zerbitzuburuak eta José Luís Malagón, Eutiquio Gil, Salustiano Cartón, Francisco José Campos, Vicente Fernández, José María Pozas, Ángel Luís Moreno, Jesús Pérez, Francisco Javier Seco kartzelariak izan zituen akusatukide.

Jende bitxia eta moral bikoizduna, idazle modura agertzen da, egun, Martinez Motos jauna, erretiroa lortu ostean "Recinto Interior" idazlana argitara eman zuelarik. Zerri goseak, ezkurra amets.

## **Mantxako** *basamortu idorra*

Hala eta guztiz ere, 1983ko azaroan iritsi ziren euskal preso politikoen lehen kunda handiak Herrerara. Guztira, lau modulotan bananduta, 240 kideentzako espetxea zen, hirurogeina moduloko. Urtea amaieran, 419 burkidek osatzen genuen Kolektiboa, eta Alcalá-Meco zein Yeserías ziren beste itxilekuak. Torturatzaile mesnada zaharrak ordezkatuta zeuden, eta kartzelari guzien buru berria Valeriano Gutiérrez zuzendaria zen.

Puertoko ikasgaiak oso gogoan, zuzendaritzak eutsi zion bertoko bertsio militarizatuari: sirena hotsa esnatzeko, formazioak, kontaketan ziega barruan ere zutitu beharra,... Presook ere eskarmentua genuen, beraz, erregimena itsumustuka eraso beharrean, baldintzak aztertu, puntu ahulak neurtu eta hotzean erantzutea deliberatu genuen. Hausnarketa haien zer-nolakoak Fernando Arburuak dakarzkigu gogora:

> “*Herrerara iristerakoan ezarri nahi izan ziguten bizitza erregimen hain zorrotzak eragin zuen erantzuna ematea. Izan ere, batzuk Puertorik bagentozen ere (non errejimena oso zorrotza zen) beste asko Alcalatik ekarri zituzten, eta han aise erregimen malguagoa zegoen. Ondorioz, guztiz beharrezkoa ikusi zen egoerari buelta ematea eta espetxeko bizitza guk geuk kudeatzea ahalbidetuko zuen erregimenaren alde borrokatzea. Indarrez geunden, asko geunden eta ez genuen asko galtzeko. Zuzendariari argi azaldu zitzaizkion gure eskaerak eta gero gerokoak: borroka mugagabea planteatu zen hasiera hasieratik, gure eskakizunak lortu arte, alegia.*

Beste behin ere, Espainiako Polizia eta Guardia Zibila kartzelari lanetan ibiltzeak zekartzan ondorio ankerrez landa, etsaia bizi baldintza jasangaitzak eragiten saiatuko da Euskal Preso Politikoekin amaitzeko. Herrerara iritsi orduko euskal presoek ikusi zuten sarrera-langa ondoko eraikina Guardia Zibilaren kaserna mardula zela. Aurrerantzean larruan antzeman zuten bezala, edozein aitzakia erabilita, hirurehun sardin-zahar prest zeuden kartzela atarian. Prest eta gogotsu, herra eta mendeku-gosea sobera baitzuten.

Hau gorabehera, isolamendua eta sufrikarioa eraginez euskal presoak xehatzea helburu izango zuen deserriratzearen hurrengo kapitulua zen. Herrera ezerezaren erdian dago. Egitura lauangeluarra izanik, egoitza koroatzen duen kupulatik ez genukeen ezer ikusiko puntu kardinal guztietara begiratuz gero, kilometro luzetan ez baitago ez etxerik, ez zuhaitzik ez eta giza zantzurik ere. Laua eta hotz neguan; laua eta kiskalgarri udaran.

Segurtasun neurriak puntakoak ziren: dardara-sensoreak lur azpian, ate hidraulikoak modulo-sarreretan, kamerak patioetan zein gune komunetan, kartzelari zailduak eta ehunka guardia zibil harri-barruan. Eta barne-araudia, aizkora baino zorrotzagoa. Egia esanda, ernegu bizitan eman zituzten kideek lehen hilabetak, erronka berriari nola erantzun eztabaidatu bitartean, kartzelarien legea nagusitzen baitzen. Mitxel Sarasketak erregimena deskribatu eta Xabier Izagak kontatzen digute patxada eta egonarria nondik ateratzen zuten:

“ *ETAk urriaren 14an Puerto de Santa Mariako medikua hil eta espetxeko funtzionarioak helburu militarrak zirela adieraziko zuen ekintzaren aldarrikapenean. Urriaren 19an ETApm-k Alberto Martin Barrios kapitaina hil zuen. Giro horretan euskal preso politikoak Herreran bilduko gintuztela esan zuten eta kartzela guardia zibilek eramango zutela.*
*Herrerara eraman gintuztenean, denok banan banan biluztarazi gintuzten, eraztun, lepoko, belarritako, erloju eta dena kendu. Bilutsean baina ardiak bezala edo, gero laneko buzo urdina bat eman janzteko, sandalia bi eta horrela, besterik gabe, bakoitza bere zeldara eraman gintuzten. Hiru egun egin genituen ziegan horrela, periodoa egiten. Funtzionarioek ziegako atea zabaltzean ziegaren atzeko aldean jarri behar ginen, ezin zen leihotik hitz egin... gero ziegatik irten, ate ondoan paretari begira jarri eta horrela txalo bi eman eta ilaran patiora irten, formazioa egin patioan eta beste txalo bi eta patioa hasten zen.*

*Ziegan liburuak mugatuta zeuden, lau edo, arropa, gauzak ere bai, ezin zen gauza handirik eduki ziegan... Kartzelako giro osoa estilo militarrekoa zen. Guardia Zibilak ez zeuden moduluen barruan, ez zuten ateak zabaldu-ixten, baina zentroan zeunden. Eta isolamenduko moduluan ere bai. Herrera berez nahiko berezia zen, eta kartzelariak ere horrelakoak ziren. Ohiturak, tratuak, tramiteak... dena zen estilo militarrekoa. Baina Puertotik joan ginenontzat hobeto geunden Herreran egia esateko. Herreran, patioan, jantokian, telebista gela eta eskolan ibili zitekeen aukeran. Puerton patioan egotea patioa besterik ez zen, gero ordu batzuetan telebistako gelan, horrela.*
*Oro har kolektibo osoarentzat diseinatutako espetxe politika bideratzen ari zela sumatzen genuen, denak han bilduta, egoera horretan, guztiokin zer egin nahi izango zuten begira. Gainera Herrera espetxe berezia zen, zigor espetxea, eta han biltzeak zer egin nahi zuten adierazten zuen. Komunikabideetan ere horrelako zerbait esaten zuten, han bildu eta hura izango zela gu edukitzeko modua.*

*Mitxel Sarasketa*

“ *Txapeoa delako borrokabideari Herreran heldu genion lehen aldiz; beraz, zalantzak genituen, ezezagunaren aurreko beldurrak, ziurgabetasuna. Jakin bagenekien borroka hark ez zuela ohiko plantoen odorioak izango, zenbait eguneko ziega zigorra, esate baterako, bagenekien borroka luze eta gogorra izango zela, eta halaxe izan zen. Hala ere, kartzela hartara joaterako, borrokabide*

*haren gaineko eztabaida hasita zegoen. Hari ekin bitartean, ordea, ez ginen egon erregimen hari inolako erantzunik eman gabe. Aurreko kartzeletan bezala, erantzun puntualak ematen genituen. Izan ere, zigor ziegak beteta egoten ziren beti, asteburuak ziegan zigortuta ematea ere ohikoa zen.*

***Xabier Izaga***

Azkenean, *fumata zuria* aterata, Herrerako kidegoak errepresioari aurre egiteko estrategia finkatu zuen. Nolako erronka, halako motxila, eta aspaldi ikasita zuten denboran luze joko duten borrokaldietan ezin daitezkeela erabili ziztu bizian agortzen diren bitartekoak. Hil arterainokoa ez bada, gose grebak iraungitze data dauka, eta kasu honetan borroka latza baino denboran sostengagarria bilatu nahi izan zuten. Komunikazio greba aukeratu zuten, eta inork ez zukeen pentsatu borroka molde honen arrakasta eta eraginkortasuna norainokoa izango zen. Urak bere bidea egiten duen era berean, topatu zuen Kolektiboak PSOEren exterminio taktika alderanzteko jokabidea.

## GOSE GREBA ZERTAN DATZAN JAKITEKO *MAISU-IKASTALDIA*

Gose grebarik egin gabea nintzen artean. Alde handia dago lehenengo gose greba izan edo bigarrena edo hirugarrena izan. Esperientziak, eskarmentua emateaz gain, asko laguntzen dizu horrelakoetan. Neurria hartzen diozu urari, ibiltzeari eta abarri, gorputzak beti berdin erantzuten ez badizu ere. Lehenengo gose greba hura negu erdian egin genuen, eta hotzaz askoz gehiago izorratzen zara; ez da jakiten, ea jateak eta ahuleziak edo hotzak izorratzen zaituen gehiago. Baina gorputzak gaizki erantzuten badu, gose greba laburrak gehiago izorra zaitzake luzeak baino. Esperientziak erakutsi dit hori. Baina, lehenera itzuliz, Carabanchelgo aurreneko greba hura gogorra izan zen niretzat. Ezertarako gai ez nintzela geratu nintzen. Lau lagun geunden enfermerian, ziega berean: Urru eta biok zeharo jota geundelako, eta Txino eta Rafael gu zaintzera joan zirelako. Hauek ere greban zeuden, baina gu baino hobekixeago haatik. Egundoko sagu pila zegoen enfermeriako bazterretan. Nik ez dakit non ezkutatzen ziren eta nola konpontzen ziren, baina arratsaldetan eta iluntzetan alde guztietatik agertzen ziren saguak. Hormak ez ziren guztiz lauak, pikordunak baino, eta horman gora armairu gainera, ohe gainetara eta edozein tokitara heltzen ziren. Saguak etortzen zitzaizkidan burkora, etzanda nengoen ohera; eta burkotik bekoki gainera, eta bekokian jolasean sagua! Demonio haiek uxatzeko ere ez neukan indarrik eta ganorarik. Urru ere nire antzera zegoen; hari bizarrean ibiltzen zitzaizkion saguak, habia egin nahian edo. Egoera horretan, hain ahulduta, mugitzeko ez ezik hitz egiteko ere ez duzu gogorik eta aldarterik izaten.
Sukaldaritza liburu bat irakurriz egin nuen gose greba hura, pentsa! Liburua irakurriz hartzen ninduen loak, eta hantxe zabalik geratzen zen liburua. Bazeuden bakailaoa prestatzeko hirurehun errezeta! Harekin ikasi nuen bakailaoa txuri-txuri uzteko trukoa, esnetan bustita, alegia. Hogeita hamasei eguneko greba amaitu ostean, ezjakinaren kontuak edo obsesioarenak, jaten hasitakoan ez nuen ederki pasa. Iruditu zitzaidan idiak adina jan nezakeela, eta halaxe hasi nintzen. Barazki purea prestatu ziguten lagunek, eta tragoan hartzen hasi nintzen puretik egundoko ontzikada. Ondoezik jarri nintzen berehala. Hil behar nuela iruditzen zitzaidan. Luzera gabe pasa zitzaidan, baina gorriak eta beltzak ikusita.

Antxon García del Molino (*"Gatibu sortu nintzen", Jokin Urain*)

Komunikazio greba uste baino protestaldi gogorragoa izan zen. Izan ere, kanpoko errealitatearekin harreman ia guztiak eteteak ondorioak baitakartza, epe labur-ertainera, bai luzera begirakoak ere. Moztu ez ziren harreman bakarrak abokatuekin egindakoak izan ziren, euskal preso politikoen defentsa-eskubidea bermatu eta, bidenabar, Herrera barruan gertatzen ziren bidegabekeriak kontatu ahal izateko. Gainerako guztiak, bisitak eta gutunak, bertan behera utzi zituzten kideek, senitarteko eta lagunengan egundoko kezka eta arrangura sortuz.

Zer dela eta beren burua isolatzea? Borrokaldi haren funtsa ulertzeko, Mitxel Sarasketaren iritzia lagungarria zaigu:

> “*Otsailaren 21etik abenduaren 13ra arte iraungo zuen komunikazio greba egin genuen. Garbi zegoen ezarri zizkiguten barne-arauak aldarazi behar genituela. Komunikazio grebaren zergatia horixe izan zen. Eztabaidak egon ziren hasieratik, betiko moduan, une politikoa, presoen zereginak eta abar. Eztabaidarekin planteamenduak argitzen joan ziren -batzuetan nahikoa zaila zen modulu desberdinetan geundelako- eta azkenerako barne arautegia derrigorrez aldarazi beharko genuela erabaki genuen, espetxean denbora luzerako izan gintezkeen eta kanpoko burrukari gure ekarpena ere alde horretatik bideratu beharko genuke. Erabaki horrek burruka moldea ere determinatuko zuen. Puerton gose greba gogorrak egin genituen barruko erregimena aldatzeko, baina azkenean gose grebak amaitu eta hor gelditzen ginen, denak erdi jota, osasun kasu larriak, hainbat bakartuta... eta ordura arteko erregimenarekin jarraitu behar. Horregatik hasieratik ere ikusten zen beste modu batera ekin behar zitzaiola. Gose greba egiten ez bazen ez zegoen bestelako aukera handirik, eta logikoena zen onartuko ez genituen arauei planto egitea, hau da, kartzelariei ezertan kasurik ez egitea. Bisitarik ez egitea, gutunik ez idaztea eta patiora ez ateratzea ere horregatik erabaki zen, alde horretatik erabiliak ez izateko. Komunikazio greba zen, baina guk txapeoa deitu genion, gure jarrerak berez bakoitza bere ziegan ixtea zekarrelako besterik gabe. Burruka moldea beharbada ez zen oso ondo ulertzen, gu ez baikinen ziegan gure borondatez itxita gelditzen, baina barne araudia aldatzeko egokiena zela frogatu zen. Kartzela osoa altxatuta zegoela pentsatu behar da. Ez zen erraza izan hala ere, hamar hilabete horietan gauza asko gertatu ziren, funtzionarioek oso gogor jokatu zuten, baina gu oso indartsu ginen, ziegan egon arren elkarrekin asko hitz egiten zen leihoetatik eta amore eman behar izan zuten horretan.*

Kanpoko harreman gehienak etetearekin batera, barrenak aspaldi agintzen ziena egiteko aukera topatu zuten fase berri honetan, alegia, barne-araudi estuari branka jarri eta kartzelarien nagusitasuna pikutara bidaltzea. Deskribaezina da goizeko kontaketan ziega barruan zutitzeko agindua entzun eta, lehen aldiz, ohe barrutik kartzelariei bizkarra ematean sentitu zuten barne poza. Honek, jakina, zigorrak ekarri zituen ondorio, eta protestaldia oharkabean bilakatu zen mugagabeko itxialdi. Aginte printzipioa urratuta zutenez, norgehiagoka ibili ziren hamar hilabete luzeetan. Inoiz egin den borroka luze eta gaitzenetako bat izan zela esan daiteke, ezertan exajeratu gabe gainera, eguneroko bipiltasunatik haratago, neurgaitzak diren beste ondorioak izan zituelako.

Arlo pertsonalekoak, esate baterako, izugarriak izan ziren. Bikote harreman askotan distantziaren sentsazioa biderkatu zen, eta berez zaila bada espetxealdiak ezartzen dituen baldintza horietan

bikote-proiektuak harilkatzea, are arazotsuagoa izan zen aurrez aurreko zein idatzizko hartu-emanak moztu zirenetik. Horrenbestez, afektibitate mailako gabeziak hamar hilabete haietako parentesiaren amildegian areagotu ziren, tantaka elkarrengandik urrundu ziren-eta bikotekide ugari. Xabier Izagak klitxe prefabrikatuak uxatu nahi ditu egoera hari erreparatzerakoan, matxismoaz zipriztindutako interpretazio kaskarrak egin ez daitezen:

> “ *Harremanak oro har, eta bikote harremanak, beraz, hoztu eta hautsi egiten dira maiz, leku guztietan. Kalean, eskuarki, bizikidetzan. Kartzelan, bizikidetzarik ezagatik. Barruan harreman horiek oso sendoak izaten dira, aurre egin behar dieten oztopoak gainditzeko hala behar dutelako. Horrek ez du esan nahi apurtezinak direla, ordea, eta ia urtebete elkar ikusi gabe, elkarren gutunik irakurri gabe, maitasunak iraun arren, ez da batere zaila harremanak hoztea. Jakina, gutxienez parte bat askotan minduta sentituko da, kalean gertatzen den bezala; hala ere, askotan erantzukizun nagusia ez da bikotekide batengan bilatu behar. Kartzelan, eta borroka hartan, beraz, ez da kanpoko ez barruko bikotekideari errurik leporatu behar, espetxe sisteman baizik. Erantzukizun nagusia estatuarena da.*

Esan bezala, Valeriano Gutierrez zegoen zuzendari galtzetan zigor-eremu hartan txapeoa bere gorenean zegoenean. Zeregin likitsetan aditua, ur harrotuetan ibiltzeko erabili zuen PSOEk, hiru urte geroxeago Darocan baitzegoen zuzendari, sakabanaketa hasi eta Aragoiko presondegia hartan errepresio-laborategi bat antolatzeko mandatuarekin. Bere lan-bizitzaren hondarrean Guadalajarako kartzelan egon zuen, Amedo eta Domínguez bertan zeudela, gobernu *galoso*-aren mezudun eta isilmandatari gisara.

Holako jendaila tartean, denbora galtzea zen espetxeko arduradunekin hitz egitea. Gobernua eta Kolektiboaren arteko buruz burukoa zen Herreran ebazten ari zen gudua, eta nork bere aldetik hoberena jarri zuen dantzan. Guda-dantza, alajaina! Zuzendaritzak, esaterako, gogor baliatu zituen eskura zituen bitartekoak. Isolamendu modulotik makina bat kide pasatu ziren, guardia zibilen presentzia mehatxugarria medio tentsioak goia jo zuen eta araketak, murrizketak eta abar ugaldu ziren.

Janaria penagarria zen Herreran, baina txapeoak aurrera egin ahala, elikapen tasaren gutxieneko parametroetara ere ez zen iristen, eskasa, hotza eta presio elementua zen-eta. Gerra filmetan horrenbestetan ikusi genituen pasadizoak ohitura-irudiak ziren otorduen gurdia gure *txabolo*-aren parera iristen zenean: burruntzailea lapikoan sartuta, salda urtua besterik ez zen isurtzen gure erretiluan. Hilabeteak aurrera zihoazela, ekonomatoan oinarrizko elikagaiak erostea debekatu zuten, beraz, esnea, gailetak edota ur-minerala ere desagertu ziren beren dietatik. Fruta, barazkiak, zerealak eta abarrekoak eskuragaitzak ere, gose-garaia pairatu zuten Herrerako managaitzek.

## **Ate danbatekoen** *melodia askatzailea*

Alperrik begiak zorroztea. Dena txikiago ikusten da. Hobe irudimena zorroztea, eta ikuspegia zabaldurik, min handiena nola eragin deliberatzea. Praktiko izatea dauka presoak lege, eta Herrerako lata hermetikoa irekitzeko gailu berria asmatu zuten euskal preso politikoek: burrunba.

Noizbait kide bat zigor zeldetara eramaten ari zirela, espontaneoki jo zuten, ostikoz, burnizko ateetan. Galeria osoa zeharkatu zuen harrabotsa sekulakoa izan zen. Geroztik, lehiotik lehiora solasean, norbaitek plenateatu zuen zaratari etekina ateratzen hastea. Helburua? Zaindariak asaldatzea, beren ordura arteko presentzia harroa baldintzatu eta kopuruzko nagusitasuna arma bihurtzea. Ahalik eta min handiena egiteko, etsaia ahalbait gogorren kolpatzeko. Eta bete-betean asmatu zuten.

Modulo bakoitzean lau galeria, eta hirurogei ziega guztira. Ateak burnizkoak, sendoak. Günter Grass-en Latorrizko danborra etorriko litzaioke akordura baten bati durundi handiko sinfonia haiek entzunda, eta, ezin uka, orduro-orduro ateak kolpatzen hasten zirenenan, kartzelariak korrika ateratzen ziren galerietatik. Hasiera batean, saiatu ziren ekimen berria zapuzten, aleatorioki preso batzuk hartu eta isolamendu modulora eramanez, baina alperrik, danborrada luzeagoa zen erantzuna.

Edozein modutan ere, txinpartak zirtaka ateratzen ziren sarri askotan, atearen kontra danbaka ari zirenetan kartzelariek gas negar-eragilea sartzen baitzuten

# Herrerako zenbait gora-behera

*(Apirilak 24)*

Kixkur

Bertso batzuek ateratzea
gauden lekutik kalera
mesederikan eite ezbadure
ez da izango galera.
Adierazi nahi dut hemengo
berri gutxi gora behera,
zer moduz bizi geraden jakin
nahi dunak badu aukera.

Lendabiziko esan behar dut
non kristo aurkitzen geran.
Espainiaren erdi aldean
dagon Manchako Herreran.
Txakur mordo bat dago zaindari
«hotel» hontako sarreran,
trailan dagoen zakurra askoz
politago da aukeran.

Alde denetan badaude hemen
ez dakit zenbat zaindari,
arrazoi onik ez dadukate
ta txarra berriz ugari,
mutur beltzetan gorrotoa ere
ikusten zaie nabari.
Iruditzen zait hauxe degula
infernuaren atari.

Leioak eta ateak daude
burni barrotez hertsiak
giza legerik funtsezkoenak
hankapean ehortziak.
Hainbat amets txar eragiten dit
horma hauen presentziak
askatu arte iraungo ahaldu
daukagun pazientziak.

Bederatziak aldera edo
jaikitzen gera goizian
eguneroko leloan baina
beti zerbaiten pozian.
Nola edo hala denbora pasa
ikasten da jolasian
horma txuriei begira edo
haruntz ta honuntz pasian.

Mutur gozoa ez dute jartzen
hemengo zenbait zaindarik
aparte xamar ibilitzia
komeni da hoietarik.
Eguneroko bizitza hontan
ez da arazo faltarik,
hoietako bat gure hizkuntza
zapaldu nahia delarik.

Gure hizkuntzan idatzitako
gutun edo eskutitza
bidalitako zuzenbidera
iristea nahiko gaitza.
Nondikan gehien izorratuko
horretan gogor dabiltza.
Eguneroko borroka hontan
tira biraka gabiltza.

Asko gustatzen ez bazaigu ere
kartzela honen tankera
geure arteko Euskadi txiki
bat sortzen saiatzen gera.
Arazo pranko badugu baina
poliki goaz aurrera.
Txinaurriak'e lan haundirikan
ez du egiten kolpera.

Nolabait ere adierazi dut
zer bizitza daramagun,
era honetan aurkitzen gera
ia hirurehun euskaldun.
Diferentzirik ez dago hemen
ez aberats, ez behardun.
Denok baigera presoak eta
askatasunen alargun.

Hamar bertsotan agurtu nahi dut
euskaldunon aberria,
agur baitaere lore politak
dakargun udaberria,
agur maitea, agur semetxo
aita eta baserria.
Gora euskera, gure hizkuntza
ta gora Euskal Herria.

ARGIA 47

***Jokin Urain euskal presoak ARGIA astekarian argitara emandako bertso hauetan Herrerako errealitateaz jabetzeko nahi beste osagai aurki daiteke.***

ateen azpitik, edota, istiluak sortzearren, guardia zibilak deitu eta aleatorioki lagunak jipoitzen zituztelako. Dutxetara jaisterakoan ere, halako pasadizoak errepikatzen ziren, kideak egurtu ere behin baino gehiagotan, eta erreakzioak birrinduta uzten zuen gudu-zelaia. *Herrera prisión de guerra* liburuko pasarte honetan enfrentamenduaren tamaina ongi asko neur daiteke:

> *Hamabiak puntuan ziren, eta, ados jarrita, baten batek oraintxe! esan ondoren, leihoetatik hasi ginen beren egongeletako beirateak puskatzen. Denetarik jaurti genuen: jaboiak, tarro txikiak, baldosa pusketak, eta ahal moduan metraialatu genituen beren garitak eta alboko atarteak.*
> *Guardia zibilak eta bokerak ustekabean harrapatu genituen, beirak gainean erori zitzazkielarik. Egundoko gozamena izan zen jauzika ikustea, atzera eginez eta korrika. Apur bat beranduago zuzendaria bertaratu zen, hondamendi gertutik ikustera pentsatu genuen.*
> *Deskontrolaren mugan geunden.*

Herreran zeuden kideek bazekiten jakin, euren protestaldia faktura pasatzen hasia zegoela, eta funtzionario batzuk tratamendu psikolojikoa hartzen ari zirela, egoera jasangaitza omen zitzaielako. Zigorrak etengabekoak ziren, ordea. Parteak eta parteak sartzen zizkieten, non, borrokaldia inoiz amaitzekotan, urte luzeetarako santzioak izango baitzituzten. Zuzendaritzak, antza negoziazio batetarako bazak eduki nahi zituen. Baina kartzelarien nukleo gogorrak ez zuen amore ematen, eta zirikatze lanak ondorio tamalgarriak izaten zituen sarri. Kalapitak noiznahikoak izaten ziren.

Denboraren joanean Herrerako kideen tinkotasuna eta borrokaldiaren gogortasuna ezpata bereko bi ahoak ziren. Izan ere, agintarien harrokeria kamusten ari bazen ere, jada zortzi hilabatetik gora zihoan txapeoa eta komunikazio grebaren zauriek ere nahigabetezen zuten kidegoa. Senideen bihotzean, bestaldetik, egundoko kezka zegoen, asteburu gehiegi ziren-eta bisitarik gabe emandakoak, eta asmamena aliatu txarra da zure kuttunak basapiztien eskuetan direnean.

Hala eta guztiz ere, ez ziren besoak gurutzaturik geratu, eta Herrerako lehen autobus-martxak antolatzeari ekin zioten. Bisitak ez izan arren, autobusean hurbiltzen ziren ate nagusira, eta bertantxe, batzuetan sarreran, kartzela-esparruari buelta osoa emanez besteetan, elkartasuna eta maitasuna parrastatzen zuten. Noizbait ere, zuzuendariarekin elkarrizketa eskatu eta erreibindikazioak helarazten zizkioten, Valeriano harroskoaren harridurarako. Preso baten amak kontatu digu halako batean egindakoaren xehetasunak:

> *Goizeko zortziak aldera iritsi ginen jendez mukuru zetozen sei autobusetan. Jaitsi bezain laster, ikurriñak banatu eta bi taldetan antolatu ginen hirurehun lagunok. Zuzendariarekin egoteko lau senideen batzorde bat osatu genuen, eta beste guztiok kartzela inguratzen zuen lursailean barruratu ginen. Dena ti-ta, gau luzean erabakita baikenuen zer eta nola egin. Hiru aste lehenago zuzendariari helarazi genion erreibindikazio-taularen gaineko erantzun bat konprometituta genuen mandatariarekin, beraz hitzordu garrantzitsua zen, nahiz eta bide horretatik ezer gutxi aterako genukeela jakin. Nolanahi ere, presoen eskabideak geureganatzean, bi fronte irekitzen genituen batera, azken batean, eskakizun asko bisita erregimenarekin lotuta zeuden-eta.*

Besteak beste, moduloetan barrena presoak jatorrizko herrialdearen arabera sailkatzea, bisitarako bidaiak erraztu eta bisita txanda erosoago antolatzeko. Halaber, modulotik modulora libreki pasatu ahal izatea zen Herrerako batzarraren exijentzietako bat. Guk, bi horiek eta gainerakoak helarazi ondoren, zuzendariaren  jokabidea neurtzera joan ginen. Taxu onekoa, itxuraz, indarrezko ekintza burutzeko asmoarekin joan ginela pentsatu eta horren arabera prest zegoela ihardetsi zigun bapatean, baina segituan, doinua baretu eta, administrazio-berbaera erabiliz, ja-jai esan zigun. Txiri-txiri irten zen senideen batzordea eta gurekin batera presoei animoak bidaltzeko lanari heldu zioten. Harresien bestaldetik jaso genuen ordaina: maite zaituztegu! oihukatzen zuten ozenki.




***Herrera de la Manchako kartzela sarrera. Fondoan, bere kupula ezaguna.***

Kartzela barruan, aitzitik, torlojuari beste bira bat emateko ordua iritsia zela sinetsita, arrabotsaren uhinak zabaltzea erabaki zuten.

Kartzela inguruan, guardia zibilen kaserna ez ezik, kartzelarien familiak biltzen zituen erresidentzia-konplexu bat ere badago, non ehunka pertsona bizitzen diren. Presondegia lekutan ezarria, *ghetto* moduko bat eraiki zuten zaindarien hurbilekoentzat. Beraz, zergatik ez zabaldu kutsadura akustikoa beren lasaitasuna hondatzeko?

Esan eta egin, goiz eta arratsalde parteko burrunbada bertan behera utzi eta gau-ordutegia jarri zioten beren protestaldiari. Loaldia aldatu, eta orduro urratzen zuten gaua Herrerako euskal preso politikoek. Egoera zegokion lekura itzuli zen, eta gaueko isiltasuna zulatzean, *guda-dantza* kartzelarien etxeko logeletaraino eraman zuten. Anabasa kontaezina izan zen. Orduan, funtzionarioen emazteak eta seme-alabak ilaratan zeuden medikuarenera joateko: antsiolitikoak, lo egiteko

pilulak, lasaigarriak eta, batez ere, etsipenaren emari mikatza zeramaten soinean. Kartzelarien beraien bisaia goibeldu zen, eta presoak izorratzea ez zen hain dibertigarria. Moldaketa harekin, *dzast* bete genuen garaipenaren saskia.

## **Burni goria** *epelduta*

Hirurehun egun beranduago, 1984. urteko abenduan, bihozgogor jardun zuen gobernuak berak Herrerako egoeran armistizio moduko zerbait lortzeko agindua eman zion bertoko zuzendariari. Kolektiboaren lehen garaipen handia izan zen, Puertoko erregimena puskatu gabe bertatik atera ostean, hil ala bizikoa baitzen sarraski kartzela berri hartako bizimodua eta buruantolaketa garbiki finkatu eta politikoki hornitzea.

Akordioaren ñabardurak paperatuta, garaile eta garaiturik gabeko hitzarmen bat erdietsi zela pentsa zezakeen, baina Madrilgo agintariek zein euskal preso politikoek ikusmolde bera zeukaten borrokaldiaren azken emaitzari zegokionez: gobernuak porrot ikaragarri izan zuen, eta Kolektiboa eraberrituta eta morala goian atera zen ataka zail hartatik.

Konponbiderako orubean hiru akordio-ardatz nabarmendu zitezketen: lehena, Kolektibo gisako eskubideen esparrua errekonozitu eta zabaltzea. Horren ondorioz, autoeraketarako oinarrizko tresnak baimendu zitzaizkion: eskolak, garbiketa edota aisialdiaren antolatzea Kolektiboaren esku geratzen ziren erabat; horrez gainera, Kolektiboaren izaera politikoa moduloko ordezkarien bitartez gauzatuko litzateke, haien arteko lotura eta harreman marko finko bat jarrita (astean behineko bilera, kartzelariak aurrean egon gabe), zuzendaritzaren aurrean Herrerako Kolektiboa osoaren mintzakidetza osatzen zuten.



***Herrerako patioa, galeria batetik ikusita.***

Bigarren lorpena erregimen militarraren deuseztapena izan zen. Izan ere, formazioak, kontaketetan zutitzeko beharra eta, oro har, nagusitasun zantzua ekar zezakeen edozein keinu edo beteki-

zun lekuz kanpo geratu zen handik aitzin. Bidenabar, kartzelarien presentzia eta beharrizanen eskumena gutxieneko zereginetara murriztu zen: moduloko sarreran zegoen ateondokoan egon eta, ordua iritsita, ziega, dutxa edota eskolako ateak ireki-ixtea.

Hirugarren atalean, bisita eta gainerako komunikazioen antolamendua biguntzea izan zen. Euskarazko gutunak libreki jaso eta bidaltzea, nahiz eta itzulpenerako atzerapena egongo litzatekeen. Mintzalekuetan euskaraz libre aritu ahal izatea, eta bisita egunak eta orduak esleitzeko presoen jatorrizko herrialdea kontuan hartzea, ez soilik administrazioak egindako moduloen araberako banaketa. Ez zen *Jauja*, baina bai biziraupena bermatu eta politikoki garaile ateratzeko *status* onargarria, jakina.

Anartean, PSOE eta PNVren arteko eztei-bidaia bere onenean zegoen. 1985ko urtarrilean sinatuta, Euskal Herriaren kontrako hitzarmenak episodio berriak izan zituen, gerra zikina, tortura eta preso politikoen aurkako estrategia kriminalak beren gailurrera iristen ziren legealdi berean. Kartzeletan, damutze estrategiaren diseinu berria izan zen higidura aipagarriena, Kolektiboa indarrez apurtuko ez zutela jabeturik baitzegoen Felipe Gonzalezen ministro-kabinetea. Mugimendu haietan PNV izan zen laguntzaile fina, EAren eszisiotik irten berria, Madrilek kirtenetik eusten zuen itun politiko hartan botilero lanean baitzebilen.

Damutze estrategian, Kolektiboan pitzadurak eragin eta, elur-bolaren efektua baliatuz, Ezker Abertzale osoa ahultzea ziren mugimenduen noranzko zaharberrituak. Dena delarik ere, Adiskide berriagatik ez utz zaharra atsotitzaren esanahia oso present izan zuen PSOEk, errepresio gordina ez baitzen inoiz desagertu espetxeetatik. 1985. urtean bi estatuen kartzeleetan zeuden euskal preso politikoak 369 ziren, eta egoeraren bihurritze haren lekuko zuzenak izan ziren.

## **Bide zarra,** *bide txarra*

Egia esateko, borrokaldi hartatik eratorritako egoera urte luzeetan Kolektiboak ezagutu zuen onuragarrienetako bat izan zen. Kartzelariekin etengabeko iskanbilak ez ziren desagertu, baina komunaren potentzialtasuna xurgatzeko aukera aparta eman zion Kolektiboari. Dela formazioa, dela euskara irakaste prozesua, dela elkarbizitza eta gure buruantolaketan urrats berriak emateko, onurazko garaia bizi zuten kideek. Karlos Ioldi ataundarrak 1985an iritsi zen Herrerara, eta bertan lortutako egoeraren balantzea egitean zera azpimarratzen du:

> *Orain urteak pasata, ikuspegi zabalago batetik begiratuta, neronek ateratzen duduan ondoriotako bat da, borroka hark nolabait mugarri bat jarri zuela garai hartako kolektiboaren izaeran eta, zer esanik ez, irakaspen bat suposatu zuela ondoren etorri ziren borrokaldiei begira.*

*Borrokaldi zio nagusia kartzelako bizi baldintza hobeak lortzea bazen ere, aldi berean Kolektiboaren aitortza politikoa ere bilatzen zen. Eta egia esateko, gu Herrerako presondegira iritsi ginenerako bertako bizi baldintzak duinak oso ziren. Modulo bakoitzak zuen bere dinamika, baina, irizpide orokorrak lau moduloen artean, edo hobeki esanda, kolektibo osoak markatzen zituen. Komuna moduan funtzionatzen genuen. Modulo barruko funtzionamoldeaz eta gu arduratzen ginen. Garbiketa zela, kafetegia kudeatzeko garaian, azken finean, moduloko bizitza gure eskuetan zegoen. Garai hartan, kartzelariak soilik ateak ireki eta ixtera mugatzen ziren. Gutunak edo paketeak iristen zirenean haiek guri entregatzen zizkiguten eta banaketa gure esku uzten zuten. Modulo bakoitzak bazuen bere arduraduna. Hauek, astean behin biltzen ziren, beti ere Presondegiko Zuzendaritzaren baimenarekin. Arduradun hauetaz gain baziren ere modulo bakoitzean ikasketetako arduradunak; antzeko funtzionalmoldea bazuten ere, beraien eginkizuna bestelakoa zen.*
*Gu antolatzen genuen barneko bizitza, euskarazko ikastaroak zirela, bestelako ikasketak, garbiketako txandak, dutxak nork garbitu eta abar. Hau guztia bideratzeko genuen tresna, moduloko batzarra zen. Batzarra zen erabakiak hartzeko goreneko organoa. Han hartzen ziren erabakiak binkulanteak ziren guztiontzat. Kolektibo osoari begira erabakiak hartu behar zirenean guztion artean eztabaidatu eta azkenean bozketan bidez erabakitzen genuen zein norabide hartu. Askotan idatzi izan da komunaz edo komunako kideez. Nolanahi ere, han bizi izan genuen esperientza, Europan bakarrenetarikoa izan zela esan nezakeen.*

Formazio eskolak egin ziren, eta nahiko modu espontaneoan, masaje, gimnasia, marxismo, euskara, historia edota txistu eskolak antolatu zituzten burdinen artean. Denak probetxugarriak, nahiz eta batzuetan, gehiago jakin nahi izate hark burukomin galantak sortzen zituen. Irriparre gozo eta, aldi berean, triste batez halako pasadizo bat ekartzen digu gogora Joxean Agirrek:

“ *Sekula ez dut ahaztuko txistua jotzen ikasteko Turroi-k jarri zuen gogoa. Egoskorra zen izatez, eta buruan zerbait sartuz gero, egin arte saiatzen zen, baina txistua jotzen ikasiko zuela erabaki zuenean, Asterix galiarraren antzera, zerua geure burutik behera eroriko zela uste genuen. Patioko bazter batean eseritzen zen eta, fi-fu-fa, hura tortura latza zen. Halere, Eusko Gudariak eta Agur jaunak bederen ikasi zituen.*



Iñaki Rike *Turroi*, Lezamako euskal preso politikoa, hamazazpi urtez egon zen espetxeratuta (1983-2000). Herrerako borrokaldietan kide eskuzabal eta saiatuenetakoa, Baionako hospitalean hil zen 2006an, minbiziak jota, Espainiako torturatzaileen eskuetatik ihes egin eta geroxeago. Jose Antonio Torre Altonaga *Medius*-ek bere semblanza hunkigarria luzatu zigun Turroi hil eta berehala:

*Horrelakoxea zen gure Lezamako errubioa. Buru-gogorra, baina zorioneko buru-gogorra. Askorentzat eztabaidarako oso grinatsua; halere, garai haietan eztabaida beharrezko erreminta zen, eztabaida zelako iraultzailearen abiapuntuko lanabesa, eta Iñakik bere burua iraultzailetzat zuen denaz gain. Ez da erraza, nolabait honelako egoeretan pertsona laudorioz betetzen dugulako, baina, Iñakiren kasuan, laudorioak sobera daude, bera izan delako, arestian aipatu denez, azken muturreraino konpromiso militante bat eroan duen gizona, eta esan dudana egiaztatzeko ikustea besterik ez dago, hamazazpi urte luze eta borroka betean espetxean jasan ondoren, konpromiso militante eta iraultzaileak ihesaren bidean abiarazi zuela, erbestean bizi eta azken hatsak bertan eman arte.*

Lehen azpimarratu legez, borrokaldiaren uzta izan ziren bizi baldintzak behin eta berriro defendatu behar izan zituzten Herreran zeuden euskal preso politikoek. Akordioa onesti ondoren, zuzendari aldaketa etorri zen, eta Manuel Pérez Flores izan zen *alcaide* berria. Eginkizun gisara lehengo egoerara ahalik eta lasterren eta ahail eta kostu gutxienekin itzultzea zen, eta xede horrekin astindu zituen funtzionariorik faxistenak.

Eskola zaharreko zein berriko ikasle aurreratuak zeuden Herreran. Gogoko zuten iskanbila gehienek, eta soka horretakoak ziren *Nazi*, *Niñato*, *Moraco*, *Santanderino*, *Pistolas*, *Vaquero*, *Morritos* eta abar luze batekin, tai gabeak ziren probokazio-erreakzio gisako gora-beherak.

Gizatasunik gabeko azpiespezie horren ankerkeriak asko eta oso ezberdinak izan ziren, baina, adibideak adibide, azken urteotan Jaengo espetxeko zuzendari izatera iritsi den Manuel Martínez Cano Morritos ezagunaren izaera laburbiltzen duen anekdota honek deskribatzen du, ezerk baino hobeto, gizon-emakume horien jite doilorra. 1986an lehen moduloko kide batek min handia hartu zuen patioan, futbolean ari zela. Sahietsa barruraino sartu eta, kolpearen ondorioz, zauri handia egin zuen aurpegian. Medikuak ikusita, hospitalera eramatekoa zela erabaki zuen, eta guardia zibilek anbulantzia ekarri zuten, zaurien egoerak Carabanchelgo espetxe-hospitaleraino eramatea aholkatu zuen-eta.

Ordurako, *Morritos* modulo-burua zen Herreran, eta arratsalde hartan sarrera-moduloan zegoen, zauritutako kidearen zain. Beste batzuek lagunduta anbulantziaraino eraman zuten arren, kartzelatik atera baino lehenago biluztarazi behar zuela agindu zuen, garai hartan ohi zuen modura. Ozta-ozta zutik mantentzen zen kideak uko egitean, zigor-partea egin zuen. Bueltan, ia hamar ordu beranduago, berdin-berdin egin zuen, eta beste zigor-partea egin zion bisaia eta alde oso bat bendatuta zekarren presoari. Urte mordoxka beranduxeago kartzelari berberak Iñaki de Juanaren kontra deklaratzera joan zen, horrek idatzitako artikulu batean aipatua agertzen zelako. Mehatxupean sentitu zela deklaratu zuen *Morritos*-ek. *Otsorik ez denean, ardiak ausartak*, esaten ohi dugu Euskal Herrian.

## **Ihes egin,** *bizi ahal izateko*

Espetxe politikaren herio-hitzorduak ez zuen luze jo, alabaina. Urtebeteko aldearekin, bi euskal preso politiko hil ziren, Jose Ramon Goikoetxea Alcalá-Mecon, eta Joseba Asensio *Kirruli*, Herreran.




Mecon bi komuna zeuden, miliena eta poli-miliena, hain zuzen ere. Autonomo gutxi batzuk poli-milien modulo berean zeuden, gauza asko konpartituz, baina berezko izaerari eusten.

Dena delarik ere, kartzelan ziren euskal preso politiko guztiak ez ziren jadanik sartzen EEren eta espainiar gobernuaren damutze estrategia estuaren mugetan barrena. Antolakunde batekoak edo bestekoak izanik ere.

Joserra horietako bat zen, eta bolada gogor bat igaro eta gero, berrogeita hamabost eguneko txapeoa egin eta hainbat gose greba burutu ostean, bere alkondaraz urkatu zen Mecoko hirugarren moduloko dutxetan, kideei ezer egiteko aukerarik eman gaberik. Urteak pasata, inork ez du ulertzen gertatutakoa, itxuraz ondo baitzegoen Loiuko gaztea, eta egun berean bera bisitatzera hurbildu zen lagunak ohi moduan aurkitu zuen: serio antzean kontu delikatuekin, eta txantxa gogorekin bestelakoetan.

Beste aukerak deskartatu gabe, presondegiak hil zuen Joserra Goikoetxea 1985ko ekainaren

26an, Mecoko segurtasun handiko kartzelako hormatzarrak lekuko bakartzat izanda. Ez ziren garai gozoak Madrilgo espetxe hartan, izan ere, Herreran bezala, errejimena ez ezik, kartzelarien jokabideak ere zapuzten baitzuen lasai bizitzeko edozein aukera. *Perfumes, Endañeta, Estefanía* eta beste funtzionario faxista askok ahaleginak eta bi egiten zituzten bertantxe eskura zuten *status*-a galarazteko.

Epaiketak egiteko eramaten zituzten miliak Herreratik Meco-ra. Astebete lehenago lekualdatu eta, berandu jota, epaiketa egin eta astebetera bueltatu Herrerara, hori baitzen, ez besterik, beren destinu petrala: basamortu hartan erruak kitatzea.

Mecon zeuden presoek bazuten senideekin aurrez aurre egoteko aukera, bisean biseko bisitak medio. Bertan onartu eta Herreran debekatzeko arrazoiak oso bistakoak ziren. Sasoi hartan bisitara zihoan preso baten neska lagunak oso garbi dauka zergatia:

> “*Denetarik zeukaten frogatuta Kolektiboa eta senideen batasuna apurtzeko, eta saiakera guztiak alperrikakoak izan ziren. Beraz, makilez ezin zutenez, azenarioaz ere frogatu nahi izan zuten, komunikazio baldintza hobeagoak lortzearren espetxe batetik besterako traslado eskaerak egongo zirelakoan. Preso zein senideen erabakimen kolektiboari pitzadura egin nahian baimendu zituzten Meco bisean biseko bisitak, eta sutsuki hasi baziren ere, laster batean antzeman zuten porrot egin zutela. Maite duzun pertsonarekin egon ahal izatea izugarria bazen ere, banakako pozak guztion eskubidea urtzea onartezina baitzitzaigun.*

Egoera politikoak inori ez zion bide ematen basalurrean geratzeko. Esan nahi dugu borroka deliberamenduak hurbildu zituela komuna ezberdinetan banatuta geratu ziren kide gehienak, zortzikiak, milikiak zein autonomoak ez baitziren ontziratu Erreformaren bidaian. Halere, komuna bakarra sortzea arnas luzeko ekimena izan zen, oraindik azalean zeuden-eta Soriako garaian izandako aurkaketak. Poli-milien zazpigarren asanblada likidazionista salatu eta gero, zortzigarrena burutu zuten hainbat kidek, borrokan jarraitzeko asmoz. Aldi berean, poli-mili izandako beste askok miliekin bat egiteko prozesua abiatu zen, eta iheslarien artean nahiko erraza eta naturala izan bazen ere, askoz gehiago kostatu zuen espetxeetan, aipatu arrazoiak zirela kausa. Hala eta guztiz ere, denbora kontua zen, eta erresistentziak leundu ziren azkenik. Damutu ez ziren autonomoekin ere, ikuspegi ezberdinak egonda, koskak berdindu eta kartzela barruko bateratasun maila majoa lortzera iritsi ziren. "Divide et



***Iñaki Pikabea eta Joseba Sarrionaindia, Martuteneko Iheslariak.***

vinces" Julio Cesaren esamoldea ez zen gure lurrean atxikitu.

Gaizkileengandik ihes egiteko irrika, bestalde, ez zegoen amatatuta, eta Euskal Herri osoak jaieztanda egin zuen Joseba Sarrionandia eta Iñaki Pikabea Martutenetik ospa egin zutela jakin bezain pronto. 1985ko udara hartan izugarrizko poza korritu zuen, herriz herri, txosnaz txosna, dantzaldiz dantzaldi, *Sarri* eta *Piti* Imanol Lartzabal kantariaren baffletan izkutatuta irten zirela zabaldu zenean.

Biak Harry Houdinik berak amestu ere egingo ez zuen moduan desagertu ziren Martuteneko gartzelatik San Fermin egunean. Imanolen kontzertua baliatuz atera ziren presondegitik eta inor ez zen konturatu ordu batzuk pasa eta presoen errekuentoa egin zuten arte. Josu Landa eta Imanol bera atxilotu egin zituzten, ihesarekin zerikusia zutelakoan. Mikel Antzaren bila ere aritu ziren, baina hau ere ihes egina zen, klandestinitatera. Landak ipini zion epilogoa eskapisten historia honi *Argia* aldizkarian, kalera irten ondoren eskainitako elkarrizketan. Titularrarekin bakarrik, erronkaren garrantzia ikustarazten da: "Ihesketa honek ametsak posible direla frogatu du":

> *Ni detaile batekin geratu naiz guztiz txunditurik. Azken finean, gartzela barruan (preso sozial nahiz politikoen artean) kalean baino askoz poz haundiagorekin jaso zela Martuteneko ihesketa honen berria, eta hotzean ikusita, inork baino arrazoin gutxiago dute pozteko. Esan nahi dut paperaren gainean kalkuluak ateratzen hasita kontutan hartu behar duzula ihesketaren ondorioz hartu diren errepresalia eta zigorren ondorioz dagoeneko kaleratzekotan zegoen jende askok beste hilabete batzu gehiago egin beharko dituela barruan, zenbait jenderen kasuetan urtebeteko kontua ere bihurtzen dela diferentzia hori, araudiaren aplikazioa izugarri estutu egin dela, Martutenerako trasladoak moztu egingo direla... matematikoki hotzean pentsatua nahiko argi dago niretzat ihesketa hau ezin dela esan errentablea izan denik, eta halere ondorio txarrenak beren haragitan sofritzen ari diren presoak izan dira gehien poztu direnak, nik aurretik inoiz imajinatuko ez nuen neurrian. Eszepziorik gabe, gainera, berdin zion poli-miliak, damutuak edo preso sozialak izateak. Nik esango nuke preso guztiek ekintza kolektibo bat bezala asumitzen zutela, oxigeno-baloi izugarri bat suposatu duela ihesketa honek. Gartzela barruan daudenentzat (kanpoan gandenontzat bezala), ihesketa honek ametsak posible direla frogatu du.*



**Herrera de la Mancha: zela bertako bizimodua aldatzeko, zela gotorleku hartatik hanka egiteko, fronteko lehen lerroa izan zuen EPPkk askapen borrokaren latzean.**

Nekeak bizi nahi ez, Herrerako laugarren moduloan tunela egiten hasi ziren hartara bertarartutako kideak. 1986. urte hartan, kartzelaratu berriak biltzen zituen moduloa zen laugarrena, eta, iritsi berriak edo, bazuten halako soslai erromantikoa, kartzela hartako azken harresiraino zeuden hamarka metroak lur-azpiko pasabide batetik gainditu nahi izatea soilik abenturazale porrokatuek egin zezaketen lan eskerga zen-eta. Ibilian-ibilian, eskola ondoko komunetatik abiatuta, zorua zulatu zuten kideek eta itxaropenak aurrerabidea aurkitu zuen.

Butroiaz hitz egiteko obra bataiatu zuten. Hala, Braulio izenaz ezagutu zuten zuloa. Meatzari lanetan ihardun zuen lagunak utzi digu pasadizo haren testigantza:

“*Borrokaren dinamikatik datorren borrokalari batentzat, kartzelako lehen garaiak, dinamika horrekin oso dago lotuta eta burua horretan edukitzeaz gain presondegitik nola ihes egin izaten da bere pentsakera bakarra. Kolektiboaren historian egon dira saiakera bat baino gehiago, baina gutxi batzuek erdietsi izan dute nahi hori.*
*Hasieran genion bezala, borrokako lehen lerrora itzultzeko grinaz, laugarren moduluko dutxetan zulo bat egitea erabaki zen. Zuloa bertan egiteko arrazoi nagusienak bi ziren, alde batetik, nahiko toki lasaia zelako eta, bestetik, bertako ordutegiak nahiko tartea ematen zigulako lana aurrera eramateko garaian.*
*Zuloa egiten hasteko moduluan bertan ez genuen tresna egokirik, eta lehen lehenik arazo honi egin behar zitzaion aurre. Dutxako zoruan jada toki egoki batean bilatu genituen sueltoak zeuden bi baldosak. Hauek erraz mugitu eta altxatzen ziren, baina arazoa zen hormigoia nola zulatu.*
*Arazo honi aurre egiteko, tresna egokiren bat bilatu behar genuen. Buruari hainbat buelta eman eta gero, konturatu ginen polikiroldegian bazela gimnasia egiteko potroa izeneko tresna, eta honek bazituela luzatzen ziren hanka batzuk eta hauek aproposak izan zitezkeela gure zereginetarako. Astean bitan joaten ginen polikiroldegira. Bertan, kartzelari baten zaintzapean egoten ginenez tentu handiz ibili beharrean geunden. Egun batean aipatutako burnia lortu eta gero, kartzelaria zerbait arraroa sumatu eta zerbitzuburuari deitu zion. Zerbitzuburua gerora hain ospetsua egin zen Herrerako zuzendaria Jesus Eladio del Rey Rejillo zegoen. Ustez susmagarria egin zitzaien laguna deitu eta detektagailutik pasa zuten, baina ordurako honek beste lagun bateri pasatua zionez ez zen ezer gertatu. Hori bai, guztioi egin izan baziguten, hantxe bertan geratu izango zen zapuztuta gure asmoa eta ziurrenik ere gertakari hark edukiko luke ondorioa gure bizi baldintzetan.*



*Zuloa hastekoan zarata handia atera behar zenez, patioan hain ohizkoak ziren futbol partida antolatzeaz gain, txistulari bat ere jarri genuen. Iñaki Rike zen gure zaratagile solfeoduna. Zuloaren hastapeneko uneak nahiko bereziak izan ziren. Aldez ezer pentsatuta ez genuenez, unean uneko arazoen aurrean bat-bateko irteerak bilatzen genituen. Lehen arazoa lurra non sartzea zen erabaki behar genuena. Arazo honi egia esateko segituan bilatu genion irteera, paretan zeuden azulejoak askatuta, horma zulatu eta lurra horma-danborren barrenetik botatzen genuen.*
*Tarteka ere, harri handiren batekin egiten genuen topo, eta orduan modulu tartean zeuden patio hutsak edo horietara botatzen genituen. Hori bai, horretarako lehenik poltsa baten barnean sartu behar genuen eta ziegatara igotzen ginenean egin beharrekoa egin.*
*Zuloarekin aurrera gindoazen heinean, horma guztiak lurraz bete genituen eta orduan zabor kuboetan, zaramarekin nahastea erabaki genuen. Ezin zen kantitate handiegirik sartu eta honek zuloa egitearen erritmoa moteltzea suposatzen zuen.*
*Hau ikusita, erabaki genuen komuneko sabaian zegoen tartea ere aprobetxatzea. Fluoreszentea zegoen tartea aprobetxatzen genuen eta bertan eskaiola zegoenez, hau zulatu eta lurra plastiko txiki batzuetan sartu ondoren barruan sartzen genuen. Lurra plastikozko poltsa sartzearen zergatia zera zen lurra bustia zegoen eta beldur ginen denborarekin ura ez ote zen eroriko sabaitik.*
*Hilabete luzeak eman genituen zeregin horretan eta moduluan sumatzen zen nolabaiteko jakin-mina edo zuloaren inguruan eta egia esateko giro polita zegoen. Izan ere, zuloaren lanaren inguruan kide asko inplikatu behar izan ziren. Batzuk, lurra ateratzen, beste batzuk lurra paretan sartzen eta askok ere, zelata lanetan kartzelari harrapatu ez gintzaten.*
*Zuloarekin aurrera gindoazen heinean linterna moduko batzuk egin genituen eta ondo moldatzen ginen. Zuloak jada bazituen dimentsio adierazgarriak. Izan ere, luzeran jada moduluko azken paretaren parean geunden eta hormigoiaren azpitik gindoazen. Jakina, oraindik lur asko atera behar genuen eta hamaika arazori aurre egin beharko, baina ongi gindoazen. Ahalegin egingarria ez ezik, zuloaren bitartez ihesaldia lorgarria ere bazen.*

Zortea ez zegoen euskal preso politikoen aldetik, eta igeltsozko sapai-faltsuan gordetzen zuten lurraren pisuak horren hondamendia eragin zuen. Berehala, zikindutakoa garbitu eta lurra ahal moduan ezkutatu ondoren, zerbiztuburua deitzea erabaki zuten: "Ikusten duzuenez, espetxea zatika ari da erortzen eta edozein egunetan ezbehar larriren bat izango dugu", esan zion modulo ordezkariak kartzeleroari. Gezurra bazirudien ere, ziria sartu zieten, eta artapena arduraduna abisatuko zutela hitz emanda joan ziren modulotik. Hala eta guztiz ere, tarrapataka ibiltzeagatik, egun hartan lur-azpian jarduteko erabiltzen zen txandala ahaztuta geratu zen dutxetan, eta funtzionarioek aurkitu zuten egun bereko miaketa arrunt batean. Bi gertakariak lotu eta tropelean etorri ziren, dena arakatu, zoruko baldosa guztiak burnizko barrez kolpatu eta, azkenik, Madriletik propio etorritako bokeras talde berezi baten laguntzarekin, topatu zuten jadanik hamar bat metro zituen *Braulio*.

## **Egunerokotasunaren** *printzak eta ziztak*

Egunero hasten dira aukera berriak, ordea, eta halaxe, Herrerako kideek jarraitu zuten afanak eta olgurak uztartuz. Konstante bat izan bada ere, garai hartan batzar ugari egin ziren EPPKren eginkizun politikoa hizpide zelarik. Biziraupenerako gutxieneko baldintzak bermatuta, prozesu politikoan nola eragin, zer ekarri eta nola lagundu ezker abertzale osoaren hausnarketa kolektiboan hitzetik hortzera astintzen zituzten gaiak ziren, eta eztabaida guztietan bezala, jarrera kontrajarriak ere agertu ziren.

Oso hilabete baliotsuak izan ziren, azken batean. Kolektiboaren eraginbidea zirriborratu eta, bidenabar, ziklo batetarako koordenadak garbiki adosteko aukera eman baitzieten bi estatuetan. Oso modu orokorrean erresumituz, elkarren kontra jotzen zuten argudiobideak bi ziren: batzuen ustez kartzela barruan erresistitzea, duintasun kolektiboari eutsi, bizibaldintzak blindatu, eta gure izaera eta jarduera politikoa etengabe nabarmentzea nahikoa eta sobera zen. Beste batzuen ustez, aldiz, ez damutzea baino askoz gehiago egin behar genuen kolektibo gisan; izan ere, izaera politikoa eta ekinbide politikoa elkar lotua daude, eta prozesuaren baitako beharrei erantzuteko ezinbesteko ekarpena zen euskal preso politikoena, beraz, etengabeko borroka eta eragintza egokitzen zitzaizkion EPPKri, dela gure eskubideak defendatzeko, dela estrategia orokorraren eremuan ofentsiboki jarduteko.

Kanpotik ikusita, edonork esango luke txanpon bereko aldeak direla. Baina aurpegia eta ifrentzuaren arteko dialektika zorrotzean, berez osagarriak diren jokabideak modu baztertzailean ulertzera iritsi ziren maiz. Horrela gauzak, krisiak eta moduloen arteko tirabirak sortu ziren. Urteen joanari esker sasoi hartako suminduraren hutsaltasuna soma dezakegu protagonista izan zirenen artean. Mitxel Sarasketak horrela dakusa:

> “*Nik ez dut uste ez bi jarrera trinko zirenik ez eta bi ikuspegi zirenik ere. Jakina bazirela jarrera eta ikuspegi desberdinak, eta bi zirela esan daiteke hainbat gauzetan polarizazio hori ematen zelako, baina gerora sakabanaketak frogatu zuen bezala kontua ez zen hori.*
>
> *Nik ikusten dut pertsona multzo bat, tentsio egoera batean sartu eta biltzen badituzu, hor hainbat eztabaida eta erabaki hartu behar direla, elkarrekin bizitzen… nahi ta nahiez arazoak sortuko dira, forma bat edo bestea hartuko dute, politikoa, domestikoa edo nahi duzuna, baina arazoa egoerak berak sortzen ditu.*
> *Joera argi ere ikusten zen moduluen artean. Alde batetik kartzelariek gu hainbat irizpideen arabera sailkatzen eta moduluetan juntatzen ibili ziren. Gauzak horrela, normala zen eztabaidak, planteamenduak eta abar modulu bakoitzak bere aldetik ibiltzea, edo modulu batek gehiago lerratzea zen beste batekin, besteekin baino.*
> *Lau moduluetan egoteak eragin handia izan zuen alde horretatik. Baina hori normala da. Pentsa ezazu denok batera modulu berean izanda arazoak izango ziren, baina lau moduluetan zelan kontrolatzen dituzu edo zelan bideratzen dituzu arazo horiek.*

*Isolamenduari buruz Kale Gorriak atera zuen bideo batean preso-ohi aleman batek azaltzen zuen zelan Alemaniako gobernuak presoak talde ez oso handietan banatu zituela, barruan askatasun handiarekin eta kanpoko loturak oso murriztuta. Azkenean preso haiek denek amaitu zuten elkarrekin hasarretuta, talde politikoak zatituta eta inork inorekin ezer jakin nahi ez zuela. Eta esaten zuen gobernuak taldeak zatitzeko planteamentu zientifikoa egin zuela horrela jarrita, bazekielako bizimodu horrek ekarriko zituela ekarri zituen ondorioak, ondorio politikoak ere alegia.*
*Horri aurre egiteko kontzientza politiko argi eta handia izan behar da, egoera hori ulertzeko esan nahi dut. Baina neurri handi batean kontzientzia eta jarrera politikoen gainetik ere dago hori guztia, egoera gogor batean norberaren ezinak aldamenekoari egotzita nolabait asetzeko daukagun joera edo bada.*
*Nire ustez suerte izan genuen eta sakabanatu gintuzten. Orduan hobeto ulertu genuen zer gertatzen ari zen. Gogorragoa ere zen sakabanaketa, baina, badakizu, gogorra ez da beti txarraren sinonimoa.*

Fernando Irakulis Kaifas-ek ere parte hartu zuen aipatu eztabaida eta zorrozkerietan:

“*Garai haiek ulertzeko gure artean etengabe egiten zuten selekzio prozesua hartu behar da kontuan. Esan nahi dut, irizpide objektibo zein subjektiboan oinarri hartuta jartzen gintuztela modulo batean edo bestean: zigorrak eta leporatzen ziguten ekintzen nolakotasuna, izaerak, bapatekotasuna,... Bizileku estu hartan harreman pertsonalen esparrua ez da izaten, gainera, eramanerraza, beraz, enkontru eta desenkontru pertsonalek ere ahalbidetzen zuten dinamika orokorraren alde bateko edo besteko norabidea. Horrez gain, erreferentzialtasunak ere bazuen bere eragina, batzuen itzal handiak sortzen baitzituen aldekotasun zein kontrakotasun mimetikoak. Dena dela, errepresioak batzen gintuen derrigorrez, eta etsaiari aurre egiteko beti topatu genuen modua, beraz, oso garbi daukadana zera da: neurriz kanpo ateratzen genuela bereizten gintuena, eta batzen gintuena, aldiz, gutxiesten genuen.*

Bistan da, kontraesanak ere gainditu behar izan dituen Kolektiboa izan dela euskal preso politikoena. Askotan, erabakiak muga-abiaduran hartu behar zituztelako, noizbait ere erosokeriak edota muturreko zurruntasunak ernegaldi latzak sorteen zituztelako, Herrerako barne historiak pasadizo zokoragarriak baditu izan. Baina egia esateko, gutxi izan ziren harrotasun kolektiboa eta zirrara sortzen diguten oroitzapenekin alderatuz gero.

Hezur eta haragizkoak, borroka latzak eta eztabaidez gainera, beti izan zuten tartetxo bat gauza txikietarako. Esaterako, mus-eskola ere bazen Herrera, bazkaldu aurretik ia guztiek eguneroko garagardoa jokuan jartzen baitzuten, kartetan zorte bila. Komunaren maskotek ere Herrerako usadioan utzi zuten urratsa. *Txiri*, adibidez, txikitan kabitik erori eta kideen artean hazi zen zozoa zen. Sorbaldatik sorbaldara ibiltzen zen, patioan zein jangelan, norbait erruki izan eta fruitu lehorren kajoira joanda otordua osatuko ziolakoan. Angel Montes Totxo bilbotarra zen, dena den, bere kuttuna, eta gauero zihoan bere ziegara babes bila.

Uso bat ere eman zituen bere azken urteak Herrerako kideen konpainian. *Txiri* baino dezente inozoagoa, Juankar Alberdi eta Julen Galartza kideak zituen bidaide, beren eskuetan sentitzen

baitzen inon baino seguruago, nahiz eta lo egiteko Eugenio Irastortza ordiziarraren txaboloa nahiago zuen. 1988ko istilu berrietan hil zuten guardia zibilek, porra kolpe batez jangelako mahai baten gainean lerdaturik. *Txiri* behin eta berriro garbitzen saiatu arren, pikoletoak baino azkarragoa zela erakutsi zuen, eta 1989ko lekualdatze masiboekin batera desagertu zen, presoen patua bere gain hartuta edo, erromes bizitzeko. Jakina da: zozoak ez du beti sasi berean kantatzen.

Neska militante presoen egoerak pasadizo gogorrak sortzen zituen. Halere, tentsioguneen erdian beti zegoen zer edo zer, Kolektiboaren nagusitasuna eta kemena azalarazten zituena. Kontaketa baten haritik eratorritako nahaste-borrastea kontatzen digu Itziar Galardik Yeserías-en emandako azken hilabeteak gogoan:

> *Goizeko 08:00eetan kontaketa egiten zuten kartzelariek. Tinbreak jo, eta, hall-ean kontatzen gintuzten. 4. moduluan, miliez gain, polimiliak, autonomak, Grapokoak,... geuden moduluan, eta, kontaketak egiteko, bi taldetan banatzen ginen: batean Grapokoak, eta bestean beste guztiok. Behin, ordua baino lehenago hasi zen funtzionario bat tinbrea jotzen. Ordulaurden falta zen oraindik 08:00etarako. Txirrina jo eta jo hasi zen. Oraindik orain, gehienak lotan geunden. Pentsa zer nolako esnatze zakarra izan genuen. Poliki-poliki hasi ginen kontaketa egiteko hall-era igotzen pijamak jantzita. Aurrena batzuk, txirrin gehiago jo, beste batzuk,... denak esnatu ezinik, marmarka, esnatze zakar harengatik. Ez ziren gelditzen gainera. Jo eta jo jarraitzen zuten. Nor edo nor falta zen hall-ean. Halako batean, falta zen kidea eskuan balde handi bat zuela agertu zen. Besteok horman kontra ginen bitartean, zuzen zuzenean tinbrea joka aritu zen funtzionarioarengana jo, eta baldeko ura bere gainean hustu zuen. Funtzionarioak korrika ihes egin zuen. Zerbitzuburua etorri, eta, ura bota zuen kidea ziegan itxita izan zuten hainbat egunetan. Besteok ere hura ikustean gustora aski esnatu ginen.*



***Yeseríaseko patioan egindako azken argazkietako bat. Besteen artean, Koro Egibar, Mertxe Gonzalez, Rosa Jimeno, Arantza Karrera, Paula Oteiza eta Itziar Galardi ikus daitezke 1984ko irudi honetan.***

Carabancheleko kartzelan ospitaleko hegal bat indartu eta egokitu zuten euskal preso politiko emakumezkoak bertan ixteko. Kakabantxel goitizenez ezagun bihurtu zen kartela zahar-berri honetan jorratu zuen gobernu sozialistak emakume militante presoak suntsitzeko bere enegarren taktika. Gaitzetik gaitzera, txarrera jo zuen errealitateak, orduko lekukoak izan ziren presoek oroitarazten duten bezala:

*Hilabeteak generamatzan kartzelarien ahotik entzuten Carabanchelgo espetxe eremuan emakume preso politikoentzat modulu bat egokitzen ari zirela. Halaxe izan zen, 1985ko azaroan izugarrizko polizi pilokin helikopteroa ere goitik kontrolatzen zigularik, trasladatuak izan ginen guztiak. Momentu hartan berrogei bat emakume, bakoitza bere ekipaje eta espetxean eduki genezakeen ondasun apalekin: liburuak, diskoak, irratiak, horniloak, ...baita gurekin bizi zen katua ere. Gauza txikia bada ere, bereziki gogoratzen dut katua zaintzen zuen kideak nolako mimoarekin prestatu zuen kartoizko kutxa, katua bertan sartu eta ezkutuan eraman ahal izateko, animaliak espetxean edukitzea debekatua baitzegoen.*
*Trasladatuak izango gineneko zurrumurrua zabaltzen hasi zenean, nolabaiteko ezin egona, jakin nahia, kezka sortu zen gugan, aldaketa horrek zer suposa zezakeen hausnartzen hasi ginen. Azpiegiturari zegokienez, kontuan izanik obrak eta txukuntzen ari zirela Yeseriaseko espetxea baino askoz ere baldintza egokiagoak beteko zituela pentsatu genuen, aldiz barneko erregimenari zegokionez arau zorrotzak, gogorragoak izango zirelakoaren susmoak genituen, ordurako trasladatuak izan baitziren beste espetxetan zeuden kideak.*



***Carabanchelgo patioan euskal preso politikoek egindako talde argazki bikaina. Argazkia, 1986ko udarakoa da.***

*Heldu ginen ba Carabanchelera. Binaka sartu gintuzten harrerako gelara, ekipajea eta tramankulu guztiak alde batera utzi (oinarrizko gauzak bakarrik har genezakeen) eta gutako bakoitza derrigorrezko kontrolpetik pasa ondoren, binakako ziren ziegetan banaka sartu gintuzten. Lehenengo egun*

*hura ziegan pasa genuen, bertan bazkaldu, afaldu, eta leihotik leihora oihuka, aldamenean geneukan kideekin espetxeak sortu zizkigun lehengo inpresioak, sentsazioak konpartitzen pasa genuen. Barne erregimena zorrotzagoa izango zelaren lehenengo susmoa hurrengo goizean baieztatu genuen. Ziegatik banaka eta bi kartzelero atzean genituela jaitsi arazi gintuzten gosaltzera, jan gelara, han giltzapean uzten gintuztelarik. Ikustekoa zen zer harridura eta osti txarreko aurpegiekin heltzen ginen. Iruzkin guztiak ildo berdinekoak ziren: "horrelako jarrera militarizatuak onartu ezinak dira, errotik moztu behar ditugu, zer edozer egin behar dugu..." Bero-bero geunden. Poliki-poliki euskal preso politiko guztiak elkartu ginen zegokigun jan gelan, GRAPOkoak beste batean.*

Bertara iritsita, bizi balidintzen okertze nabarmenaren aurrean zer egin eta nola erantzun burubelarri hausnartu zuten kideek:

“*Gosaltzeko unetxo hura, bat bateko batzar bilakatu zen, isildu gabe aritu ginen baina ez genuen ezer zehatzik erabaki , finean ailegatu berriak ginen eta ze erregimena ezarri nahi ziguten ikusteko, egun batzuk itxarotea egokia zela iruditu zitzaigun. Hiru egun pasa genituen ziegatik atera gabe, eta ziklo gogor berri bati aurre egiteko prestatu ginen. Denborarekin oker ez ginela deskubritu genuen.*

## **Joseba** *Asensio Artaraz*

Indautxukoa zen *Kirruli*, bilbotar petoa, eta Herrerako 3. moduloan zegoen preso. Igande goiz batean Joseba Asensio Artaraz, *Kirruli*, ez zen ohetik jaiki. Zerraldo aurkitu zuten polizien aurrean ziztu bizian korritzeagatik olinpiko ezizena merezi izan zuen burkidea.




***Joseba hil zuen gaitza lehen munduan ia erradikatua dagoen tuberkosia izan zen.***

Erdi Aroko presondegietan legez, utzikeriak eta sarraski gogoak hil zuten *Kirruli*. Herrerako x-izpien makina matxuratuta zegoen beti, eta oinazea zuela esanez berarengana joan zenean, xarabe bat errezetatu zion espetxeko medikuak, nahiz eta denbora luzea zeraman bularreko minarekin. Bronkitisa diagnostikatu zitzaion, baina autopsia egiterakoan birika bat guztiz atrofikoa zegoela ikusi zuten. Beste era batean esanda, Nuria

Castro de Pedro sendagileak ez zuen ezer susmagarririk antzeman, Josebaren koadro medikoa tuberkolosiak eragindako infekzio septiko larria izan arren.

Egun bereko arratsaldean kartzela hartako lagun guztiak, taldeka, azken agurra egitera joan ziren haren gorpua jarri zuten korridorera. *Olinpiko* hankaluzea biriketako gutxiegitasunez hil zen azkenik, sei urte bakardadez, gosez eta xarabez hiltzen eman ondoren. Josef Mengele bezalaxe, Nuria Castro eta bere lankide medikuak ez ziren beren kasa ziharduten sendagile autistak eta sakailatzaileak. Erantzukizunak estatuaren ingurumenetik bilatu behar da, bi estatuen espetxe politika kriminalak heriotza baitu helburu. Damutu ala heriotza esan da askotan. Eta ez da kontsigna hutsa.

Abokatuen ahaleginari esker, auzipetua suertatu zen Herrerako medikua, eta hiru urte beranduago Ciudad Realeko auzitegian absolbitu zuten Nuria Castro. Ebazpenak zirrikitu bat utzi zuen demanda zibilerako, lotsagarritzat jo baitzuen horrenbeste presoentzako x-izpien aparaturik ez egotea Herreran, baina ardura kontuetan Estatua ente abstraktua da, eta erantzule gisako zigorrik ez da ezartzen kaltetuak euskal preso politikoak direnetan.



**Kartzelak bere baitan dauka gaixotasuna: erreintsrtzioa aldarrikatuz, hil egiten du.**

Askatasuna ukatzen duen eremua nekez izan daiteke osasungarri edonorentzat. Horratik, kartzelak bere baitan dauka gaixotasuna: bai askatasun eza berez delako gaitza eta baita espetxearen bizi baldintzek luzarora gaitz zehatzak eragiten dituztelako ere. Hori espetxeak presoari eskaini diezaiokeen arretarik txukunena eskainita ere. Gurean, hori ere ez. Espainiar eta Frantziar estatuko espetxeetako egoera arreta egoki horretatik oso urruti dago. Espainiako espetxe askok ez du presoari beharrezko aditasuna eskaintzeko bitartekorik, ez humanorik ezta materialik ere. Areago, arreta ez jartzeko erabakia, erabaki politikoa, espetxe politika ankerraren atala baino ez da. Hurrengo urteak trajikoak izan ziren EPPKrentzat, eta larrutik ordaindu zuen bere koherentzia.

Damutze politikaren hanka laburrek, bestalde, eszenatoki trakets eta karkaila ahalbideratu zuten. Milaka preso zein iheslarirentzat burnizko uztarriari distira atera bitartean, beren burua erreintsertatuta agertzen nahi zuten gutxiei, ordea, alfonbra gorria luzatu zieten. Estatuaren eskuzabaltasuna, ohi bezala, konturako dibidendua zen.

## **Damuketaren labirintoa** *inguratzen*

Dolores Gonzalez Katarain, *Yoyes*, handitasun politiko larria izan zuen damutze estrategiaren peoia izan zen. Berariaz edo, agian, gobernuak zein bere inguruak ibilkatua, ezker abertzalea, euskal preso eta iheslarien kolektiboak edo ETA bera ahultzeko eskaini zuen bere burua, inoiz izan zuen itzalak bere jardunbidea justifikatu eta, bide batez, hauspotuko zuelakoan. Poli-milien baratza laiaturik, milien eremura ekarri nahi izan zuten damuketaren filosofia. Arbuio orokorra jaso zuten arren, xake-taula hartan *Yoyes* alfil koalifikatu gisara jokatzeari ekin zion osterantzean, Mexikotik etorri eta, barne ministerioarekin negoziatuta, Hego Euskal Herrira itzuli zenean.

ETAk hil zuen Ordizian, 1986ko irailaren 10ean. Agiri batean "espainiar sozialdemokraziaren estrategia errepresiboaren kolaboratzaile politikotzat" jo zuen bere kide ohia. Askapen prozesuari bizkarra eman eta traizio egitea egotzita, mingarria bezain beharrezkotzat eman zuen haren kontrako ekintza burutzea. Nolanahi ere, oihartzun eta inarrospen handia eragin zuen ekintza hura medio, damutze estrategiaren bigarren fasea etena geratu zen. Errotik etena. Joku zikin hartan sartu ez zen EPPKk ere bere iritzia plazaratu zuen ondorengo asteetan, *Zutabe* agerkariaren 44. zenbakian:

> *Gure borrokak norberaren bolondrezko nahian dauka oinarri, jakina, bakoitzak duen aukera, gogoa edota indarraren arabera. Halaber, nahi dugunean aldentzen gara, baina bazterrean geratzeak ez du esan nahi bandoz aldatu, salatari gisa jardun edo etsaiarekin kolaboratzea zilegia denik. Albo batera geratzeak borrokan jarraitu nahi duenari bide ematea esan nahi du, besterik ez.*
> *Zentzu honetan, Yoyesen kasua nahiko adierazgarria da. Iparraldeko egoera eta iheslarien bizimodua inoiz ezagutu den gogorrena den honetan, atxiloketak, deportazioak, entregak, extradizioak eta GALen jazarpena pairatzen dituzten garai berean, kritikak eta gaizkiak entzun gabe Mexikon nahiko lasai bizitzen zen Yoyes Barrionuevok eskainitako kolaborazio markoa onetsi zuen. Beraren eta haren kide ohien egoeraren arteko kontrasteak ezin argiago frogatzen du hartu zuen erabakiaren larritasuna eta espainiar gobernuaren jokabide errepresioboarekin lerrokatzea. Ez da bakarrik konponbide orokorra ahaztuta bere irtenbide pertsonala bilatu zuela; inoiz baino larriagoa den iheslarien egoerarekiko mespretxua ere bada.*

Yoyesen heriotza izan zen, nolabait esateko, 1983an PSOEk eta PNVk hitzartu zuten damutze estrategia hondoratu zuen gertakaria. Zen Plana-k eta *Adituen Txostena*-k aholkatzen zuten bideak ez zuen jadanik inora eramaten.

# **Herrerarako** *martxak*

"Urte osorako animo-biltegia betetzeko adina indarra ematen zigun ekimena izaten zen Herreraraino joatearena". Holaxe definitzen zuten martxa urtero bertaratzen ohi ziren amnistiaren aldeko mugimenduaren bi kidek.

1984ko txapeo luzearen amaierarekin batera antolatu zen estreinakoz, eta orduz geroztik, gero eta parte hartze handiagoarekin, urtero urtero egin zen ekimen politiko hura euskal preso politikoen Kolektiboarekiko elkartasuna bideratzeko modu ikusgarriena izan zen dudarik gabe.




***1986 martxan Herrerako euskal preso politikoek erakutsitako pankarta.***

Luze eta zabal, asko eta oro har oso ondo idatzi eta hitz egin da Herrerako Martxari buruz. Azken batean, herri mugimenduak sustatutako mobilizazio erraldoi eta parte hartzailea izanik, sektore ezberdinetako subjektu ugari hurbildu ziren: musikariak, idazleak, sindikalistak, elkartasun komiteak, nazioarteko delegazioak,... Makina bat artikulu idatzi dira, ehunka minutu grabatu dira, emozio neurrigabeak isuri dira espetxe ondoan edo guardia zibiliek kordoia ezarri eta pasatzen ez uzteko aukeratutako soro eta zelaietan.

Presoon sentipenak, ordea, ez dira horren zabalduak izan. Horien tamaina hartzeko, arrapaldan eta elkarren segidan batzuk idazteak ez du, ziurrenik, Kolektibo osoarenak laburbilduko, baina prisma koloretsua osatuko dugulakoan gaude.




Sentipen bereziak sortarazten zigun. Egun berezia izaten zen. Bezperan nekez egingo genuen lo eta urduritasuna somatzen zen. Zenbat autobus, herri bakoitzetatik zenbat; ea Herrerako aurreko aldea irixtea lortuko ote zuten galderak eta zalantzak borborka pilatzen zitzaizkigun.

Egun horretan, lagun gutxi batzuk beraien ziegan geratzen ziren. Izan ere, gutxi batzuk soilik zuten pribilejioa beraien lehiotik kanpora begira edukitzearena. Gainontzeko ziegako lehiotik, soilik edo barneko patiora begira zeuden edo eta, aurrez aurreko horma izango zuten ikusmiran. Ikurrinak jartzen genituen leihoetan.

*Goiz partea oso zirraragarria izaten zen. Egun osoa irratia entzuten pasatzen genuen eta irrikitan egoten ginen egun osoan zehar. Egun horretarako hamaikatako berezia prestatzeaz gain mahai gehienetan aste osoko garagardoak gordeta izango genuen. Egunak merezi zuen moduan ospatu ahal izateko.*
*Mahai bakoitza izango zuen beren erara prestatutako menu berezia. Ziurrenik, gehienak bakailaoa izango genuen. Izan ere, etxekoak sartzen zizkiguten janarien artean bakailaoa zelako sartzea baimentzen ziguten janari bakarrenetakoa.*
*Komuna moduan funzionatzen genuen eta kanpotik sartzen zizkiguten paketeak denontzakoak ziren.*
*Urte batean kanpoan jarri zuten irrati bat entzutera iritsi ginen eta hunkigarria izan zen kanpoan zegoen jendearen animoak eta entzutea.*
*Egoera benetan berezia sortzen zen. Urteak pasa badira ere orduz geroztik, bertan egondakoari*

*nekez ahaztuko zaizkio honelako egun gogoangarriak. Preso dagoenak babes politikoa behar badu ere, are eta gehiago behar izaten du babes afektiboa. Eta honelako egun batekin, bi behar horiek batu egiten zirela esango nuke.*
*Hiru alditan lortu zuten gure herritik joandako milaka pertsonak gure ingurura iristea. Gaztela Mantxako mutur koxkor batean geunden eta gezurra badirudi ere, Bonoren lurraldean, bera ere ohartu gabe erabat irabazia genuen lur mutur hura. Oso txikia eta presondegi barruan, baina zenbat indarra zegoen hormaz barru aldeko lau modulo haietan!*

*Karlos Ioldi*



*“Oso era hunkigarrian; festa gisa. Belarriak erne egoten ginen denak, etxafuegoen zaratak entzuteko zain, eta behin martxalarien presentzia ziurtatuz gero, patioan edo ziegako leihoetan egoten ginen, kanpoko kanta, oihu eta zalaparta entzuten. Hunkigarria zen oso jakitea hainbeste jende hurbildua zela Herreraraino elkartasuna adierazteko...*

*Fernando Arburua*

*“Orduan sinestezina iruditzen zitzaigun senide eta lagunak, bisitarik egiterik ez zutela izango jakinda ere, asteburuetan kartzela aurrean egiten zituzten elkarretaratzeek hartu zuten tamaina. Niri oraindik sinestezina iruditzen zait Euskal Herritik ehunka kilometrotara hamar mila lagun biltzea, elkartasunak har dezakeen tamainaren erakusgarri.*

*Xabier Izaga*

> *Herrerako martxak "komunikazio" borrokaldi horretan hasi ziren, bertara bisita egin ezinik ere joaten ziren familiarrak, eta han ibiltzen ziren batzuk leihotik oihuka... gero martxak antolatzen joan ziren, eta amnistiaren aldeko mugimenduaren mugarri ere bilakatu ziren.*
>
> *Kartzelan borrokan zaudenean, eta batez ere txarto bazagoz, edo bakarrik, horrelako gauzak oso hunkigarriak dira. Pentsatzen jarrita Herrerako martxak barruan egunero genuen giroan bizitzen genituela esan dezaket. Hasiera etxekoak hara kanpora han gurekin zeudela esatera joaten zirenean, bere neurria zeukan burruka hartan, hau etorri da, besteak hori esan du eta horrelako zerbait zen. Gero martxak antolatu eta gure burrukari laguntzeko autobusak antolatzen hasi zirenean, ba, aurrera ari ginela eta buelta emango geniola espetxeko araudiari. Eta martxa handiak egin zirenean, han, emozio uholdea zen, denetan parte hartzeko gogoa, eta aurrean edozer izanda ere aurrera egingo genuelako euforia bat. Kartzela horrela bizitzen da, taldean, kolektibo baten barruan. Gero ziegara joan eta zeure baitan bildurik nik sentimendu uholde modura bizitzen nituela esan dezaket, haraino joaten zen jende hura guztiak dena merezi zuela pentsatzeak, kartzelako ziega baten iluntasunean...*
>
> Mitxel Sarasketa

EPPKren meritua da, eta ez makala, oso urte gutxitan kartzela barruko estatuaren estrategia kareletik bota izana. Izan ere, Herrerara eramaterakoan, kartzela frontean borroka erreferentzialtasuna itzaltzeko behin-betiko txertoa topatu zuela uste osoa baitzuen Felipe Gonzalezen gobernuak.

Arlo instituzionalean PNVkin elkar ulerturik, tortura, gerra zikina eta hiltzera tiro egiteko kontsignak eta estalpen ofiziala bermatzean, jadanik preso ziren militanteen soslai politiko eta kolektiboa suntsitzeko plangintzak osatzen zuen izuikararen mosaikoa.



Alta, errepresio gordina pairatuta ere, Kolektiboak kolpea enkajatu eta mila bider gogorrago itzuli zuela esan daiteke, damuketaren eskaintzari egindako arbuio sendoa barne. "Ezin genuen imajinatu -hausnartzen du borroka hartan protagonsita izan zen preso politiko ohi batek-, txapeoa amaiturik berriro patiora jaitsi ginen goiz hartan, zer nolako zaplastekoa ematen ari gintzaizkion estatuari. Ikuspegi laburrez antzeman genuen garaipena, baina, denborak erakutsi duen legez, Herrerako gudua irabazteak lurperatu zuen betiko gure borondatea asimilatzeko eta gure izaera politikoa urtzeko nahikeria".



Fase hartan, borrokamolde berriak, besteak beste, txapeo mugagabea eta gerra psikolojikoa, ohiko erresistentzia dinamikarekin uztartu ziren, beti ere sen kolektiboa eta parte hartze politikoa jardunbidearen ardatz egikarituta. Gobernuak ikasgai garrantzitsu bat barneratu behar izan zuen: EPPK suntsituezina zela, eta handik aurrera zolitasun bereziaz estutu beharko lukeela etekinik atera nahiz izanez gero. Etorriko ziren azti berriak, jakina.

# Laugarren epealdia

1986-1989



*Sakabanaketa*
*ala*
*heriotza*

Enrique Mújica Herzog,
Justizia ministroa 1988tik 1991ra.

## **Galtzaile txarraren** *jitea*

Egun sailburu autonomikoa dugun Azkarraga eta Ardanza lehendakari ohia bezalakoak sakabanaketa eta isolamendu politikaren asmatzaileak eta babesle sutsuak izan ziren: "Mantener a los presos de ETA lejos del entorno y presión etarra para contribuir a su reinserción" errepikatzen zuten behin eta berriz. Hortxe daude hemerotekak. Hitz ponpoxo eta "humanista" horien atzean, gordeka, hizpide eta asmo zeken bakarra zegoen: "Damuketa ala hil", espainiar agintariek sustatu duten espetxe politikaren zuntza eta lelo-arima, hain zuzen ere.

Gainera, harroxkoen adierazpeneetatik beti zer edo zer azpimagarri dagoenez, Ardanza jelkide emeritoak ezin ozenago esan zuen duela hiru urte, "PSOEk guk animatuta jarri zuen indarrean sakabanaketa politika". Ajuria-Eneako itunean egosturiko beste hitzarmen mota izanik, PNVk kolaboratzaile ez ezik, bultzagile porrokatu gisa ere jardun zuen EPPKren kontrako lan eta afanetan, Múgicak berak publikoki onartu zuen bezala. Irakur dezagun 1992ko martxoan ARGIA aldizkarian egin zioten frogagiri gisako elkarrizketa hau:

> “ ***Galdera:*** *Enrique Mujika Herzogek bultzatu zituen transizio garaian PSOEren eta EAJren arteko harremanak. Zer dira hainbat gairen inguruan gaur egun dauden borrokaldiak?*
>
> ***Erantzuna:*** *Borrokaldi horiek kezkatzekoak diren arren hoztasunez eta urruntasunez erreparatu behar zaie, bestela ezin dira gauzak hehar bezala baloratu. Oinarria jarria dago: sozialisten eta jelkideen arteko kooperazioa. Hori da, hain zuzen ere, urruntasunez begiratzeko aukera ematen duen ardatza. Behin oinarria finkatuta. gainerako guztia logikoa da. Gobernu koalizioetan normala da alderdi bakoitzak bere ikuspegia izatea. Baina ulerkera pluralek ez dute koalizioaren plateamendua baldintzatzen. Sozioek ondo dakite elkarri laguntzea beharrezkoa dela.*

Eta lankidetza horretan elkar babestea garrantzitsua denez, ministro sozialistak ez zuen zalantzarik utzi nahi presoen kontra jelkideen aldetik izan zuten laguntzari dagokionez.

> “ ***Galdera:*** *Justizia ministroa zinenekoa da euskal preso politikoen sakabanaketa. Ez al du politika honek amaierarik izango?, koste humano haundiak ditu.*
>
> ***Erantzuna:*** *Oso elementu inportantea izan da terrorismoaren kontrako borrokan. Kontuan izan sakabanaketa indarrean jarri genuenean, gehienak kontra jarri zitzaizkizula. Gaur egun ez du inork kritikatzen. Ardanza lehendakariak berak ere esana du Gobernu espainiarrak erabateko legitimitatea duela horretarako. Presoak bi zentrotan bilduta zeuden bitartean, elementurik gogorrenek zuzentzen zuten kolektibo osoaren norabidea. Sakabanaketaren ondoren, egoera horretatik irten eta gizartean integratu nahiaren aldeko bozak agertu dira, irtenbiderik ez dutela ikusi dutelako, delitoetara bultzatu zituen ametsa betezina dela konturatu direlako.*

1986. urtean, bestaldetik, Kolektiboko kideak oso konszienteak ziren gero hurbilaz. Sarraskirako diseinaturiko espetxeak eta kartzela politikaren porrotak saikera berriak iragartzen zituen-eta. Aspalditik komentatzen zuten hurrengo urratsa Kolektiboa barreiatzearena izango litzatekeela, egunetik egunera hartzen zuen pisu eta eragin politikoak estura handitan jartzen baitzuen gobernuaren asmoa. Errepresioaren efektuak, ezker abertzalea pitzatu beharrean, biderkatzen zuen euskal preso politikoen errerefentzialtasuna eta bistan uzten zuen eskubideen ukazioa. Gaitza baino, erremedioa txarragoa.



Izan ere, morroilopean mantentzen zituzten 447 euskaldun horien eragite ahalmena gorantza zihoan nabarmen. Sei urte lehenago Iñaki Pikabearekin gertatu bezala, Karlos Ioldi preso ataundarra Gasteizko legebiltzarrerako parlamentaria izan zen hautatua azaroko bozketan, eta 1987ko hasieran lehendakarigai aurkeztu zuen Herri Batasunak.

Atril hartatik Ioldik egin zuen diskurtsoak aho zabalik utzi zuen Euskal Herria, sarri entzuten ziren beste diskurtso nahasi eta iluna egin beharrean, gardentasunez aletu baitzituen abagunearen gakoak. Berba erraza eta argia, beraz, Kolektibo- aren nortasun politikoa sendotzeko eta estatu kartzelaria bere tokian uzteko. Pasarte batzuk, zinez ahaztu ezinezkoak izan ziren kartzela barrutik entzun zutenentzat:

> "Ni neroni, Herrerako kartzelatik nator, eta han hainbat lagunek sufritzen dugun zapalkuntza etengabea da, eta hauxe du helburua: damutze bidea onartzera bultzatzea, edota errepresioa eta isolamendua bitarteko, pertsona ezereztatzea, desueztea.
> Demokrazia delako honen kontraesanik nagusiena pertsoan birrintzeko eraiki diren kartzela hauen harresiez barrundik dago. Itxitura horietan, izan ere, preso euskaldunok ez dugu etsitzen eta burrukan aurrera segitzen dugu, gero eta indar handiagoz laguntzen diguten herri sektoreen bultzadarekin.
> Damuketa eta Espainiaren batasuna aldarrikatzen eta defendatzen duten apostoluek ez daukate zer eginik, porrot eginda dabiltza eta.

Ukazezina zen: euskal preso politikoak ahuldu eta damutze bidetik eramatea helburu izanik, indartuta eta inoiz baino batuagoa agertzen zen behin eta berriro baldintzarik kaskarrenetan preso zeukaten gizon-emakumezkoen jendetalde hura.

Mendekuaren hozkadek, berriz, ez zuten etenik izan, eta presoen haragitan modu lazgarrian zuten isla. Hala, Josu Retolaza Loidi eibartarra izan zen heriotz zerrendan tokia hartu zuen hiru-

garren euskal preso politikoa. Dena hasi zen pinporta batekin; pinporta txoro batekin. Kolorez eta tamainaz aldatu eta aldatu, medikuarenera joatea erabaki zuen. Ohiko axolagabekeriaz artatua, garrantzirik gabeko kontua zela esan eta, hala!, patiora bueltan. Onera egin ez eta, gogo barik, biposia bat egiteko bidali zuten ospitalera, baina emaitzak galdu egin zituzten. Hilabeteak joan hilbeteak etorri, azkenean azaleko minbizia zuela esan zioten 1985eko irailean. Minbizia, horren aurreratua, non edozein tratamenduk ezer gutxirako balioko zuen.




***Josu Retolaza minbiziak jota eta, batez ere, medikuen utzikeriagatik hil zen.***

Urtebete beranduago askatu zuten, 1986ko urrian, baina sendatzeko ahaleginek ez zuten fruituik izan, garatxo izanik hasi zuen gaixotasunak ez baitzuen itzulbiderik. Azkenik, Deban hil zen, itsaso ondoan, maiatzako eguzki izpi epelei diosala eginez. Rosa Luxemburgek, kartzelatik idatzitako gutun batean herioarekin hitzordua finkatzeko tokiaz mintzo egin zuenean, Josuren azken burrukaz ari zela zirudien.

> *"...azken finean askoz hobeto aurkitzen naiz jardin baten txokoan, Alderdiko kongresu batean baino, hau zuri esan diezazuket zuk sentimendu hauek ez bait dituzu sozialismoaren saltze bat bezala hartuko, hala ere nik nere tokian hiltzea espero dut, karriketako burruketan edo espetxean".*

Borrokan bizi, borrokan hil. Eta halere, Herrera, Meco eta Carabanchego eztabaidak ez ziren ezinegonaren zordunak. Aitzitik, Kolektiboa eraiki, aberastu, sendotu eta politikoki aktibo bilakatzeko eginahalak ardazten zuten euskal preso politikoen eginkizuna.

GALen garaia atzean uzti eta gero, bata bestearen segidan etorri ziren ihesaldien kontrako sarekadak. Frantziar gobernuak onartu zuen PSOEk jarritako salneurria, eta gerra zikina lozorroan uztearen truke, kanporaketak eta urgentziazko prozeduraz egindako entregak ugaldu ziren. Hamarka militantea atxilo hartu, entregatu eta espainiar poliziak torturatu ondoren, banan banan kartzelaratzen hasi ziren. Modu horretan, iheslarien artean jada nahiko asumituta zegoen *miliki*-ekin bategitea zabaldu zen EPPKren baitara.

Urte luzetan beren gutunak, bisitak eta, ziurrenik, patioko elkarrizketak ere arreta handiz entzuten emanda, Madrilgo espetxe agintariek ondo asko ezagutzen zuten presoen unibertso hertsia. Nor zen nor, nolatan pentsatzen zuen bakoitzak eta zeintzuk ziren norberaren indar eta ahulguneak. Zeregin horretan, berriz ere, jelkideen laguntza izan zuen PSOEk, Torrontegi jauna eta

Gorka Agirreren kontaktuak zirela medio, pertsonalizatu zuten-eta espetxe errepresioaren objektua. Izan ere, hainbat preso eta beren senideengana jo zuten, banakako egoerak *konpontzeko*, edo samurtzeko bederen, prest zeudela esanez. Aldi berean, Espetxeetako Zuzendaritzarekin elkarlanean, ustez *gogorrak* edota *bigunak* zirenen arteko sailkapen bereizgarriak eginez hartu zuten denbora, epe ertainean errepresiorako argudioak izango liratekeela jakinda. Koiuntura hagitz garrantzitsua zetorrelakoan, gobernuak eta bere aliatuak oinak bermatu nahi zituzten, espetxe frontean kolpatzen jarraitu ahal izateko.

1987an, Paueko ihes entzutetsua antolatu zuen IK-ek, eta Gabi Mouesca eta Maddi Hegi askatu zituen. IKko kideek lan handia egin zuten ekintza hura prestatzeko. "Didier Komandoak" poliziaz mozorroturik presondegian sartu eta Gabi zein Maddi kartzelaz aldatzera zetozela sinestarazi zituen zaindariak, beraiekin espetxeko zuzendaria atxemanda zeramatelarik. Ihesaldia arrakastatsua izan zen oso, baina urte bereko ekainaren 21an Maddi hil zen Miarritzen. Poliziak berriro atxilotu ondoren, kotxe batean zegoela burnibidearen gainean, eta trenak harrapatu zuen.





**Gabi Mouesca, oraingo argazki batean, eta Maddi Hegi**

Urte askotxo joanda, holaxe gogoratzen du Gabik ihesaldiaren pasadizo hura:

*Kartzelan zarelarik, ihes egin nahi izatea askatasun aztarna bat da, eta ene barnean beti egon da nahi hori. Presoak askatasunaren desio hori galtzen duelarik funtsezko zerbait galdu du. Preso batek egun batean bizi dezakeen esperientziarik eta urratsik ederrena da ihes egitea. Arazoa da zailena ez dela ihes egitea, baizik eta gero kanpoan egotea. Berriz ere zure bizia jokoan ezartzen baituzu.*

# **Laboratorioko** *dispertsioa*

Ajuria Eneako hitzarmena sinatu baino sei hilabete lehenago sakabanatu zituzten EPPKko lehen kideak. 1987ko udatik aurrera, Murcia, Segovia, Albacete, Castellón, Cáceres, Lugo , Córdoba, Daroca, Badajoz, Ocaña, Huesca eta Almeriako kartzeletara hamarka militante eraman zituzten. Penintsulako mapa osoa ezagutzen hasteko parada izan zuten presoek eta beren ahaideek.

Hasiera-hasieratik, oso baldintza ezberdinak ezarri zitzaizkien. Errejimen lasaia baztuetan, eta muturreko estutasuna besteetan. Nolabait, erreakzio kolektiboak baino, banakakoak edota multzokakoak nolakoak izan zitezkeen ikertu nahi zuten, sakabanaketa politika orokortu aintzin bere erdiespen maila, eta batik bat, tokian tokiko eragina neurtu nahian. Preso sozialen eta kartzelarien erreakzioak ziren, besteak beste, oso ondo baloratu beharreko gakoak, dispertsioaren diseinuan bi-biak baitziren funtsezkoak.



***Ezkerretik hasita, Jokin Aldanondo, Angel Rekalde, Xabier Izaga, Joserra Zabaleta eta Inaxio Iriondo, Cacereseko kartzelan egindako argazki batean.***

Hasteko eta bat, funtzionarioen mentalidadetik haratago, ez zen erraza gerrarako jardunbidean trebatzea, euskal preso politikoen erresistentzia eta babes soziala ez baitziren nolanahikoak, eta inpunitatean zaildutako morroi haiek ardura berriak eta errepresio lanean eman behar zuten maila bereganatuko ote zuten ikusteke zegoen. Bana-banako erronka ere bazen kartzelarientzat, espezializa-

tutako espetxe gutxi haien gaindi gobernuaren estrategiaren peoi kualifikatu gisa jardutearena. Preso sozialen erreakzioa, bestaldetik, kontu handiz hartu zuen aintzakotzat, gerta baitzitekeen, euskal presoen sakabanatzearekin batera euren hazi errebeldea ere kartzelaz kartzela ereitea, guztiz kaltegarriak izango liratekeen ondorioak ekarriz. Azken batean, txantaje pean bizitzen diren preso sozialek, kateak gainetik kendu eta bere buruaren jabe bizitzeko borrokan dihardue̲n euskal preso poltikoa ikusterakoan, zer egingo ote zuten inork ez zekien. Hura ere neurtzekoa zen, jakina.

Bi aldagai horiei erreparatuta, ipar-hegoan, ekialde-mendebaldean dispertsatu zituzten presoen trataera eta bizibaldintzak finkatzerakoan irizpide politikoak eta neurgailu pertsonalizatuak bateratu ziren. Bakoitzari berea..., guztiak akabatu arte.



**_Murciako patioan, eskubitik ezkerrera, Ixidro Etxabe, Joxean Agirre, Koldo Lacasta, Jon Iurrebaso eta Juan Carvajal euskal preso politikoak 1988an._**

Aipatu ditugun bi oztopo horiek ahalbait egokien gainditzeko, lelo errepikakorra zabaldu zen komunikabide gehienetatik. Alegia, euskal preso politikoen errejimena pribilegiozkoa zela, eta nabarmen baztertzen zuela gainerako presoek zeukaten statusa. *Terrorismo gaiak* horrenbeste sentsibilizatzen duen espainiar jendarteak zalaparta egitea xede zuen kontsigna berari heldu zioten kartzelarien sindikatuek. Hala, jopuntuan jarri zituzten borroka latzetan EPPKk eskuratu zituen erregimen aldeko hobekuntzak eta erdiespenak. Duin bizitzeko oinarriak ere zalantzagarri



***Darocako espetxeko bista orokorra. Espetxe laborategien paradigma.***

bilakatu ziren. Gezurra eta demagogia izan ziren lehen sakabanaketaren euskarri eta makuluak. Darocako presondegia Aragoian dago, Euskal Herrik nahiko hurbil, baina bertara eramandako kideek larrutik ordaindu behar izan zituzten destinuaren zer-nolakoak.

Bertoko errejimenari aurre egin eta berehala, hango nagusia zen Valeriano Gutierrezek *(Herreran zuzendari izandako berbera) hertsa-bitartekoen* erabilera baimendu zituen, beraz, oso aste gutxitan eraso zenbatezinak jasan zituzten hantxe zeuden zortzi euskal presoek. Xabier Beloki preso ohiak gertaera haien kontakizuna egin du:

> *1987-ko hilbeltzaren 23a. Goizeko seiak. Herrera de la Mantxako zigor zeldetan, goizeko seietan:*
>
> *- Beloki, tiene conduccion, ya. -Sekulako hotza... eta harridura, noski.-*
> *- Queeee no, que no tengo juicios ni nada, asi ke...*
> *- Tiene 5 minutos para preparar las cosas.*
>
> *Segituan Tafalla-rengana, gauza bera. Hor hasi zen saltsa, geure artean, modulokoei abixua pasa beharrean. Ezer ere ez genuela prestatu behar geratu ginen, deus ez. Total, hamarren bat zakur zirela tartean, han eraman gintuzten autobus bateraino. Nola eraman gintuzten autobuseraino? Bueno, Josu bertan azaldu zen pijama soilez jantzita... Geuk jantzi genuen bertan.*
> *Geu Darokara. Sarrera mundiala izan zen. Lehenago modulora eraman gintuzten Mitxel, Tafalla, Josu Erdi-Praile eta ni, ahal zuten bezala sakabanatuta, bata bestearengandik ahal zen eta urrutien. Bigarren egunerako bertako presoekin hitzeginez, protesta bat egin zuten-genuen presoon eskubideak zirela eta. Horrela, Zerbitzu Burua etorri zitzaigun esanez: "A mi no me revolucionan el módulo!!" eta xuxen xuxenean zigor zeldetara eraman gintuzten, bakoitza punta batean jarriaz.*
> *Eta gose greban. Eta hotza galanta (Europa osoan "ola de frio"). Gose Grebak 30 egun iraun zuen. Bitartean bitan etorri zen jendea (zenbat) espetxera oihuka eta gu animatuz espetxea zeharkatzen zuen bitartean. Mundiala! Jon Antza ekarri zuten. Hortikan aurrera egoera bere horretan egonkortu*

*zen, Hiperkorreko ekintza izan zen bitartean. Hortxe eman zion etsaiak bigarren bultzada sakabanaketari. Horren ondorioz beste hiru lagun heldu ziren Darokara: Fermin, Txarra eta Txominena. Egoera gogortu ahala, geuk ere gogortu egin genuen geurea. Gogorraren gogorraz hasi ziren palizak, egunero hiru-lau-bost alditan gaseatuak... Gu isolatuta geunden ordurako, enfermerian, baina gasa alboan zegoen moduloraino (lehenengoraino) ailegatzen zen, bertan protestak egiten zituztelarik, noski. Egoera honek 6-7 hilabete iraun zuen. Tarte horretan edozein astakeri egin zutelarik gurekin; ETAko ekintza bat gertatuz gero, saltsa segurua. Egun batez eta egoera hau kontutan harturik, gutako batek zakurrei: "Ojala te revienten 20 kilos mañana mismo en...". Eta zakurrak: "Ba, si la teneis caducada"... eta hurrengo egunean Zaragozako ekintza!!!*

Halako batean, 1988. urte hasi berria zela, egundoko jipoia eman zioten bertan preso zegoen Koldo Dominguez donostiarrari, eta garondo-bertebretan lesio larria eragin zioten bi zerbitzuburuk eta lau kartzelarik. Elbarri geratazeko punttuan egon zen. Ageri zenez, kartzelarien esku-hartzea egunetik egunera handiagotzen ari zen. Espainiar gobernua dena ari zen lotzen ETArekin Argelen negoziatzeko, eta kartzela barruko eragingailuak ondo baino hobeto koipeztatu nahi zituen. Belokik beren orduko abagunean kokatzen ditu gertakariok:

“ *Holako batean nazkatu edo egingo ziren zakurrak eta bertako zuzendariarekin "alto el fuego" antzeko batera heldu ginen. Azkenean gauzatxo batzuk lortu genituen (elkarrekin egotea, telebista BAT, eskulanentzako bi xoiekeri... (bis-a-bisik, ez) baina ez zen gauza osorik baretu, zeren eta hortikan aurrera paliza bat baino geihago pairatu behar izan baikenuen.*
*Bederatzi lagun, zeharo desberdinak. Bederatziak bat ginen, bostehun ginen... Herrikoan ginen. Eskubideen burruka, askapen burruka, amodio burruka... Handik hilabete batzuetara, ttak, mobida. "Preparen sus cosas que van en conducción"... berriz ere. Bederatzi lagunok bost espetxetara, SAKABANAKETAREN-SAKABANAKETA.*

## **Herioaren** *orbain berriak*

Solas-toki politiko gehienetan ETAren eta gobernuaren arteko hartu-emanak hizpide ziren bitartean, espetxeetan martxan jarritako gillotinak ez zuen atsedenik hartzen.

Mikel Lopetegi Larrarte Tolosakoa zen, eta zazpi urte zeramatzan kartzelan Gasteizen, balaz zaurituta, atxilotu zutenetik.

Antzean bederen, kide lasaia zen, soina eta burua zaintzen dituen horietakoa, eta ordu asko ematen zituen gimnasia egiten edota barazkiak moduztatzen. Gertuko lagunek sekula depresio izpirik sumatu ez bazioten ere, kartzelarik hilotza aurkitu zuten bere ziegan, izara baten laguntzaz lepotik zintzilik. Herrerak erailtzen zuen bigarren euskal preso politikoa zen.




Mikelek 34 urte zituen bere buruaz beste egitea erabaki zuenean.

Ezinbestez, egundoko mina eragin zuen Mikelen heriotzak. Kasu honetan, gaixotasun fisiko batek ez zuen eraman, buru-hiltze soila besterik ez zen jazo, baina horrek izugarri mindu zuen Kolektiboa. Izan ere, "kide baten suizidioa guztion porrota ere bada, bere arazo eta buru-hausteaz ez jabetzeagatik; laguntzen ez jakiteagatik azken batean".

Tamalez, hiru hilabete eskas baino ez ziren igaro Herrerako kontzentrazio zelaitik beste kide bat gorpu agertu zen arte. Orduraarte zerbait jakina zen kartzelak min egiten zuela, baina modu horretan barrutik jan eta ondorio haiekin asumitzen ikasi behar izan zuten kideek. Oso gogorra izan zen.

Juankar Alberdi Martiarenak Krakas zuen goitizen, eta garai bateko bere itxura zarpaila zela kausa aukeratu zuten Urnietako lagunek ezizen hori.

Atxilotu eta espetxeratu zuten 1979. urtean, eta beti izan zen saltsa guztietako perretxila. Sasoitsua eta bihurria, kirol guztietan nabarmentzen zen, baita kartzelan emandako bederatzi urteetan ere; horratik zen pentsaezina hogeita hamar urteekin bihotzeko batek jota zenduko zela. Pilaturiko tentsioek eta medikuen ez axola kriminalak eragin berezia izan zuten Kolektiboan. Horrenbestez, *Krakas* hil eta berehala beste tragedia baten muga-mugan egon ziren Herrerako presoak. Alegia, Pello Cuesta lezoarra izugarrizko bihotz-krisialdia pairatu zuen egongelaren erdian. Oskar Castejón kide eta sendagilea ere bertan zegoelako dago egun bizirik, berpizte eta artatze ariketa egokiei esker jaregin baitzuen gaitzetik.




Urte betean bi preso hil ziren Herreran. Presoak sarraskitzea xede zuen politikaren arrakasta ankerra.

Mitxel Sarasketak oso garbiki deskribatzen du osasun mailako patuaren eta presoek autodefentsarako aktibatzen dituzten mekanismoen arteko oreka zaila:

> *Kartzela zigorra da. Estatuak bere dominazioa ezartzeko erabiltzen duen tresna zapaltzailea. Beraz, izatez, kontzeptu kontrajarriak dira kartzela eta osasuna. Izan ere, zigorrak kalte egiten dio pertsonari. Eta espetxea horretarako dago. Ezin dugu ilusiorik egin, bada, kartzelaz mintzatzean osasunaren alorra begiratu nahi dugunean. Horren aurrean, osasunaren aldetik, preso dagoenarentzat hainbat eta hobeto irauten ahalegintzea da kontua. Bizirik irautea, alegia. Badakizu zure kalterako dihardutela eta aurre egin behar diozula. Bidea bakarra da. Espetxean bizitzea bera borroka egitea baita, bertan bizitzeko ere borroka egin behar duzularik.*

Hautabideak ez dio betarik ematen esperantzari: zeure burua ukatu edo hil; kartzelatik damututa irten edo betiko geratu; sakabanaketaren kontraldea heriotza da.

Egun, euskal preso politikoen aurkako sakabanaketa eta isolamenduaren defentsa argia inork gutxik egiten duen arren, ez dugu ahaztu behar politika horren lehen babesle eta estaltzaileak Euskadiko Ezkerra-ko Juan Mari Bandres eta Xabier Arzalluzen PNV izan zirela. Ezker Abertzalean kontraesanak eta desgastea sortu nahian euskal militante politiko bahituen damutzea helburu zuen dispertsioa eta isolamendu politika Ajuria Eneko itunaren ardatzetako bat zen. Euskal historia hurbileko bihurgune hartara iritsi zenerako, Argeleko esperientzia gaindituta zegoen. Esan nahi dugu, ohi bezala gobernuak eta PNVk bi barajarekin jokatu zutela, eta ETAren interlokuzio taldea biltzen utzi eta haiekin akordio politkorako oinarriak aztertzen ziren bitartean, mahaia lehertarazi eta hurrengo eguneko agertoki errepresiboa ari ziren prestatzen.

1989ko martxoaren 27an, erakunde armatuak hiru hilabetez luzatu zuen bere su-etena. Halaber, elkarrizketetara mintzakide berriak eramatea proposatu zuen. Isidro Garalde Mamarru, Jose Antonio Urrutuikoetxea, eta Juan Lorenzo Lasa Txikierdi, Frantzian zeuden euskal preso politikoak hain zuzen ere.





**Urrutikoetxea, Lasa eta Garalde.**

Aljeriako hausturarekin jarraituz, esan behar helburuetako bat espektatiba faltsuak sorraraztea bazela. Kartzela barruko egoera ikusmuga zabalaz balioetsita, esan beharra dago orduan ere, beti bezala, etsaia tronpatu egin zela, zeren EPPKk garbi dauka irteera negoziazio politikoaren ondotik izango dela, eta beren interesak Herriaren interesak direla, eta inolaz ere pertsonalak.

## **BADAJOZ.** *SAKABANAKETAREN KRONIKA 1989*

Ez dugu onartuko katxeorik zeldatik sartzeko garaian, ez eta inolaz ere erropa eta liburuak zeldatik ateratzea. Txapaturik gaudela ia hilabete egingo du. Isolamendu moduloan gaude eta hemen zigorturik dauden beste sozial batzuk aurkitzen dira. Gure artean oihuka komunikatzen gara, zeren denak nahiko aparte geratzen gara, edo bestela galeriaren beste aldean. Hezetasuna nabarmena da, orain udan gaudenez ez hainbeste baina kristonakoa da, ohe azpian paper pila eta mantak jarri beharra daukazgu. Honi erantzunez, gure lehen neurri bezala ateak jotzen hasi gara, egunean 3 alditan. Esan behar, atea jotzen dugun bakoitzean 14 eguneko zigorra jasaten dugula. Atea jotzearen ondorioz, aulkia eta garbitzeko tresnak kendu dizkigute. Momentu honetan ohearen gainean idazten ari naiz. Hau gutxi balitz, karneta bat atera behar geneukala esan ziguten, ukatuz gero dirua eta paketerik ez genuela jasoko mehatxatuz, bixitak ere kenduko zizkigutela erantsiz. Guk meha- txu hori ikusita, ez genuen onartu, ondorioz ezin dugu dirua kobratu, honek suposatzen duenarekin. Momentuz dirua badaukagu, baina laister gabe geratuko gara, eta ezingo ditugu gauza minimoak eskuratu, ura, esnea...



**_Ezkerretik hasita, goian Endika Labai, Benantzio Sebastian, Iñaki Rike; behean, Joxean Kortadi eta Karlos Ioldi._**

Txapeoaren ondorioz egun osoan zelda barruan, ezin duzu zure gorputza ia mugitu, bakardadea, ixiltasuna... dena areagotzen da, askotan beharrezkoa izaten da oihu bat botatzea, gorputza lasaitzeko, eskatu egiten bait du. Egun osoa zuretzat duzu, kaleko gauzetaz pentsatzeko, lagunetaz, herrian... Zalantzarik ez dago gorputza erabat ahulduz doala, ez dugu aukerarik kanpoko edo etxeko jana jateko, eta gartzela bertako janaria eskasa eta baldintza txarretan dago; exenplu gisa, duela bilabete batzu preso bati emandako janarian kondoi puska bat agertu zitzaiola aitatu behar. Gero itxitasuna, tentsioa, era guztietako probokazioak... esate baterako, kartzeleroak errekuentoa pasatzen duenean, segun atea nola jotzen edo ixten duen, zein edo nolako kartzeleroa den ohartzen zara. Azken aldian, ateak jotzen ditugunean, leiho atzean izkutaturik egoten den kartzelero batek 'txakurras' eta 'Amedo mátalos' oihukatzen digu. Gero, kartzelero hori 'Junta de Régimen' delakoan CSIF sindikatuaren ordezkari zela jakin izan genuen. Norbaitek idatzi zuen: 'presoen statusa baino txikiago bat badago, eta hau kartzeleroarena da...'

Anartean, su eta gar ari ziren Kolektiboaren kideak espetxe askotan, biziraupenerako gutxieneko baldintzak eta duintasunaren azken marra kosta ahala kosta defendituz. Badajozen zeuden presoek, adibidez, 47 egun egin zituzten gose greban, bizitza arriskuan jarriz. Endika Labai, Jon Gaztelumendi, Joxean Kortadi, Iñaki Rike eta Benantzio Sebastian Horcajo izan ziren borroka latz hartan parte hartu zutenak. Almerian ere zakurrak oinutsik, eta sakabanatu bezain laster txapeo mugagabe batez erantzun zioten ezarri zitzaien muturreko bizimoduari. Beste horrenbeste Ocañan edo Córdoban edo Castellon edo Caceresen. PSOEk gogo bizi eta dena emanda eman zion bide jada ZEN planak aurreikusten zuen euskal preso politikoen kontrako arauzko sakailari.





***Errique Mujica eta Antoni Asunción. Sakabanaketaren betearazleak.***

Errepresioaren piezak, beraz, negoziaziorako ustezko borondatearen osagarriak ziren, eta Corcuera ministroak Argelen hitzartutakoa formaz zein edukinaz aldatuta agertu ondoren elkarrizketen prozesua eten egin zenean, Argelian zeuden mintzakide eta gainerako erbesteratuen kanporatzearekin batera, egundoko ekaitza lehertu zen Espainiako kartzeletan.

Herrerako egoera kiribilka gogortu zen. Areago, jasanezinezkoa eta behe-mugakoa bihurtu zuten nahita, sakabanaketa alegiazko gizatasuna eta zuzenbidea argudiatu ahal izateko. Enrique Mugicak eta Antoni Asunción bere Rasputín-ak bergizarteratzearen paradigma modernoa tresnatu zuten: preso zenbaitek Kolektiboaren kide gehienak zuzendu eta derrigortzen zituzten ideia hedatu zuten, ETAren aldetik preso gehienek atsegin ez zuten dinamika bat ezartzen zitzaigula sinetsi araziz.

Beraz, espetxe fronteko dialektikak kutsu mesianikoa hartu zuen: txantaiapean bizitzen ziren ehunka preso salbatzera zetorren sakabanaketa, ETAren sare estua laxatu eta askatzera, hain justu ere. Gezur hura medio, Herrerako zuzendaritzaren aurrean ordezkari izandakokak edota Kartzela-Instituzioetako Zuzendaritza Orokorraren zein PNVren aburuz erreferentzialak izan zitezkeen presoak barreiatu ondoren, Herrera lehertarazteko momentua iritsia zela erabaki zuten Madrilen. Bi urte beranduago, 1991eko irailean EPPKk kaleratutako hausnarketa batean, sakon aztertzen ziren errepresio neurri horren benetako zioak:

*Sakabanaketa, ihardunbide edo neurri politikoetarako tresna izan arren, banakako tratamendu edo bergizarteratze penitentziario bezala estaltzen saiatzen dira. Sakabanaketak, euskal preso politikoaren damuketa du helburu, eta ez gure bergizarteratze soziala. Gu barruan egotearen arrazoiak motibazio politikoetan oinarriturik baitaude.*

## **Herrera** *eraitsita*

Ezagutzen dutenek ez dute estimu handitan Jesús Eladio del Rey Reguillo. Kartzelarien artean ere, zomorro eta goranahi gisara tratatua, Tirillas izan zen zuzendaria Herrerako azken fasean.

1988ko hondarrean gorantza zihoan tentsioa Herreran, eta azaroaren 3an gainezka egin zuen lehenengo moduloan. Izan ere, beste modulotik zetorren ohar bat patioan erortzerakoan, hainbat preso eta funtzionarioen artean tirabirak eman ziren, eta horren ondorioz kide bat isolamendura eraman zuten. Jarraian, modu baketsuz, euskal presoek euren laguna zigor zeldetara eramatearen aurreko beren desadostasuna adierazteako hurbildu zitzaizkienean, bokiek ziegetara igotzea agindu zieten, modulo osoa zigorturik eta isolaturik uzteko asmoz. Orduz geroztik, kutsu dramatikoa izan zuten ondorioek.

Kideek txikitu zuten moduloa. Alarma sistemak, kamerak, altzariak, ateak, sanitarioak eta kristalak triskatuta, gotortu ziren moduloan. Asmoa zen Herrerari azkena ematea, akabera. Xabier Ioldik begiak naretuz gogoratzen du gertatutakoa:

*Esan dezadan hasteko, garai hartan Herrera beterik zegoela oso, eta barne arautegia gogor xamarra zen arren, han geudenok gogor eusten geniola gure printzipioei eta nortasunari. Jakina, hori ez zegoen ametitzerik inola ere, gotorlekurik ezin zuen estatuak onartu.*
*Orduan, gure kolektiboaren borroka maila oso altua zen eta sarritan izaten ziren era guztietako borrokak. Gauzak horrela, laister hasi ziren barne bizitza gogortzen eta jasangaitza bihurtzen; edozein huskeria, edozein aitzakia, txikikeria, aski bihurtu zen kideak isolamendura bidaltzeko bolada luzeetarako. Batzuetan indiskriminatuki eta beste batzuetan ongi diskriminaturik; bazekiten bai, nor eta noiz zigortu. Giro hau luze zihoala eta zenbait kiderentzat arriskutsua bihurtzen ari zelako, zerbait egin behar genuela deliberatu genuen. Horrela erabaki zen lehen moduloa txikitzea, motina izan zena alegia!*
*Hasieran lehendabiziko moduloan hasi zena laister zabaldu zen beste guztietara, eta honekin batera zakurren erantzuna ere.*
*Iluntze hartan sartu ziren gure modulora guardia zibil pelotoi bat; ziegaz ziega hasi ziren sartzen eta ikaragarrizko jipoia ematen gutariko bakoitzari. Askok, gorputz atal asko erabat ubeldurik zeukaten, beste batzuk berriz ubelduraz gain zenbait gorputzeko atal hautsirik, puskatuta.*
*Hau izan zen nire kasua. Zakurrek nire txabolotik irten zirenean ez nintzen gai lurretik altxatzeko ere; hala ere, arrastaka eta poliki poliki altxa nintzen eta ohiuka esan nien zerbait hautsi zidatela eta*

*goizeko 2,30tan gora behera eraman ninduten Manzanares-ko hospitalera. Han ikusi zuten eskua hautsirik nuela eta hanka ere pitzaturik nuela, gorputz osoko ubeldurez gain, noski.*
*Kamilan modulotik irtetzerakoan, zakurren artetik pasa behar izan nuen eta han ikusi nuena danteskoa iruditu zitzaidan. Zibilak algaraka guri ebatsitako ikurrinak aireratzen kriston garaipena lortu izan balute bezala, gerra trofeo moduan; baina ni pasatzerakoan ohartu ziren han ez zutela garaipenik lortu, garaipena gurea izan zela. Beraien arten pasa nintzen irrifarrez eta besoa altxatuta, mehatxuak eta irainak jasotzen nituen bitartean. Han garbi geratu zen Kolektiboaren batasuna eta duintasuna ez zutela apurtuko.*

***Patioko aurreneko turnoa goizean atera da. Patioan egoten garen bitartean egunero txaboloetan katxeoa egiten digute, baina gaurkoa bereziagoa izan da. Gure zuzendari jaunak, "Tirillas", zerbitzu buru maiteenetariko batek, "Vaqueroa", beste zenbait bokiekin batera katxeo galanta egin dute gaur txaboloetan. Normalki kentzen dituzten gauza guztiez gain —ispiluak, bizarra kentzeko tresnak, pilak,...— txaboloan genituen aldizkari eta egunkari guztiak kendu dizkigute. Igo ondoren kartzeleroei galdetu diegu zergaitik kendu dizkiguten, egunkari eta aldizkari pare bana bakarrik izan dezakegula erantzunez.***
***Guztiz nabarmena dena zera da, Tirillasena. Non ikusi da espetxe bateko zuzendaria txaboloak katxeatzen? Honek, Tirillas jaunak, bokiak oso torpeak direla pentsatzen du edo —geuk betidanik uste izan duguna— kartzeleroen ofizioa zainetan darama.***



Guardia zibilak trumilka sartu ziren moduloan, eta bertan zeuden berrogeita gutxi lagunek ahal moduan egin zioten ihes jipoi kolektiboari. Hogeitik gora zaurituta suertatu ziren, eta *Txato* Legorburu, Xabier Ioldi, Fran Franco eta Javier Urbiola Manzanareseko hospitalean bukatu zuten eguna, hezur-hausturak eta uspeldurak zirela eta. Triskantza haren irudi ahaztuezina da *Tirillas*-ena. *Sardin-zaharren* aurretik zihoala, mendi-aizto bat zeraman eskuan, Polizia Armadazo komandanteak Sorian egin zuen antzera, eta berak agintzen zuen, ziegaz ziega, nori eman egur-zatikoa, handiagoa edo txikiagoa, oihu eta odol orgia hartan. Aurrerantzean, izuaren legeak markatzen zituen egunen gora-beherak, eta bi aste ere ez ziren igaro Guardia Zibila berriro sartu eta lehen moduloko kideei egundokoa eman zien arte. Tragediaren muga-mugan geunden, sakabanaketa

politikaren ezinbestekotasuna begibistan uztea helburu zuen antzerki-lanak halaxe exigituta. Nolanahi ere, banakak ziren Herrerako espetxeari geratzen zitzaizkion egunak. Munstroak bereak egin zuen.

Euskal preso politikoen agendan agertzen ziren apunte xume hauetan Herrerako endekapena agerikoa da. Custer generala zela uste zuen mandatari zoro baten esku utzi zuen PSOEk Kolektiboaren hilobia izateko egokitu zuten Mantxako Herrera. Bere txikian, jarraitu zuen izaten sakabanaketaren mapan beste destinu mingarri, baina sekuritate goreneko filosofiaren muina eta balioa zizkatu zituen EPPKk. Arrasto gaitzak utzi zituen Kolektiboaren memorian, eta halere, erdeinuz begiratzen diogu denboraren laguntzaz: zaku berean ditugu, hala behar-eta, menderatu genituen eta pitzatu gabe geratu ziren kartzelak. Herrera, baina, Chernobileko erreaktorea baino zulatuago geratu zen.

Sakabanaketaren lehen trasladoak abiatu zirenetik emakumezko kideen kontrako dispertsioak ezaugarri bereziak izan zituen. Estrategia haren dimentsio ideala lortzeko preso bakoitzeko espetxe bat beharko zen, izan ere, erabateko inkomunikazioa, isolamendua eta deserrotzea erdiesteko hori baita marka hobezina. Baina 1988ko hondarrean 564 euskal preso politiko zeuden bi estatuen kartzeletan, beraz, espetxe egiturak ez zuen ahalbidetzen estrategiaren azken bururainoko garapena. Salbuespen batekin, orduan kartzelan zeuden emakumezkoen kopuruak beren erabateko sakabanaketa laguntzen zuen, eta berrogeita hamarrera ere iristen ez zen nesken kolektiboa guztiz barreiatu zuten.

Banaka jarri zituzten espetxe askotan, nahiz eta, leku egokirik ezean, presondegiko azken txoko ustelean isolamenduzko aretoak propio eraiki eta egoki behar izan zituzten. Arantza Urdanpilleta, Maite Rojo, Joxepa Ernaga, Ines del Río, Mertxe Galdos, Arantza Karrera, Idoia Alkorta, Inma Noble, Miren Kareaga, Edurne Iturbe, Eva Gomez, Maribi Arrizubieta, Maria Jesús Larrarte, Gloria Rekarte, Maritxu Oliver, Mila Erbiti, Inma Patxo, Itziar Galardi, Begoña Sagarzazu, Kitti Arrizabalaga eta beste asko bakarrik eta baldintza penagarrietan egon ziren, eta haietako batzuk oraindik daude, krudeltasunaren hoberentze horren karira.

Esan bezala, euskal preso politikoa emakumea denean, atxilotze momentutik emakumea izateagatik tratamentu berezia du eta egoera hau espetxean mantentzen da, izan ere presondegi gehienak gizonentzat eraikiak izanez ez dituzte emakumeentzat baldintzak betetzen. Espetxeratuak direnen emakumeen kopurua gizonezkoa baino txikiago izanez, sakabanaketaren helburua (politikoki, kulturalki eta sozialki presoa baztertzea) askoz ere errezagoa lortzen dute emakumeekin.

Urte luzeetan kuxkuxean ibili eta gero bazekiten, gainera, nolatan eta zein taldetan burutu sakabanaketa, Begoña Sagarzazuk ARGIA aldizkariak preso ohiekin moldaturiko mahai inguru batean zioen moduan:

*Norbaitekin ondo konpontzen bazinen, harengandik banatzen zintuzten eta agian ondo moldatzen ez zinen beste kide batekin jarri. Eta moldatu egin behar, hasieran gaizki baina azkenean lagun bukatzen duzu. Sakabanaketarekin presoa bakarrik dago, isolatuta zaude erabat eta erabakiak ere bakarrik hartu behar dituzu. Preso sozialekin ere harreman gehiago izan behar duzu.*

Preso sozialekin nahastea zen, Mugicak berak hala aitortua, sakabanaketarekin bilatzen zuten efektuetako bat, gobernuak uste baitzuen EPPKk ez zuela oxigenorik aurkituko berrogei milatik gorako jende-oihana horren erdian.

Kartzelarien sindikatuek eta hainbat kazetarik zabaldu zuten pribilegioen inguruko toxikazioek ez zuten lur emankorrik topatu preso sozialen gogoan, eta espetxe gehienetan, unean uneko istilutxoak albo batera utzita, elkar ulertze eta begirunezko harreman majoak lotu ziren. Urrun geratu zen errealitatea justizia ministroaren ametsetatik, sakabanaketa politikaren lehen txinpartekin aho beterik deklaratu baitzuen: "Orain ihes-ak kutsatuta bizitzea zer den ikasi beharko dute".

Oro har, tenka larririk gabe harilkatu zuten elkarbizitza, eta hasierako ezjakintasuna abiapuntua izanik, laster batean preso politikoek zein sozialek ikasi zuten besteengandik zer espero eta zertan laguntzea. Joxean Agirrek dispertsioaren lehen eskarmetua dakarkigu lerrootara:

*Ez dakit ondo zer efektua bilatzen zuten, baina preso sozialekin oso harreman positiboak izan genituen. Beti dago tartean kartzelarien isilmandatari edo bere zilborretik aritzea nahiago duen morroia, baina, balantzan jarrita, askoz gehiago izan ziren gurekin ondo moldatu zirenak uzkur edota aurka aritu zirenak baino. Kontzientzia handiagokoekin primeran, eta behartsuen zein ahulekin, sistemaren kontra iharduteko aliatu bihurtu ginen berehala (helegiteak idatziz, kartzelarien gehiegikeriak salatuz,...), beste horrenbeste. Azken finean, etsai berberak genituen muturren pare: espetxea eta bokerak.*



**Ines del Rio, Tafallako euskal preso politikoa.**

Dudarik gabe, experimentatzen ari ziren. Argeleko elkarrizketen amaiera gauzatu eta segituan orokortuko zituzten neurriak hamarka kideren larruan frogatuak zeuden, eta zer zuzendu (eta zer hobetu) finkatu zuten.

Edonola ere, 1989. urteko lehen urratsek doilorki urratu zuten espainiar estatuko kartzeletako zoru lakarra. Ines del Rio kideak halaxe laburbiltzen zuen egoera *Ataramiñe* liburuan idatzitako pasarte honetan:

*Ezbairik gabe, Argeleko mahaia osatu baino lehenago prestatu zuten Kolektiboaren kontrako neurri bateria. Bestela, ezin daiteke ulertu neurri horiek ezartzeko erakutsi zuten bizkortasuna. Egun batetik bestera, akabo irakasle, mediku eta lagunen bisitak. Bereizi gabeko araketak ugaldu ziren, ordea,*

*eta saiatu ziren gu makurtararztea, kontaketetan zutik jarri eta bisean bisekoak egin ahal izateko gu edo gure senideak biluztea ere saiatu ziren. Xaxatze lana etengabea zen, eta probokazioen soka horretan gure intimitatea zabaldu eta gure ohituren eta bizitzaren berri lotsagabeki jakinaraztea izan zen, komunikabideen laguntzarekin, emandako pausu berria. Maiatza hasierako arratsalde epel batean, kartzelako megafoniaz jakin genuen ni eta beste kide batzuk espainiar kartzela mapa osoan zehar sakabanatuko gintuztela.*

## **Inpunitate aroa** *amaitu zenekoa*

Apirilean ETAk amaitutzat eman zuen urte hasieratik indarrean zegoen su-etena, eta oso aste gutxitan erakutsi zuen, ekinaren ekinaz, ez zuela ahanzturan utzi euskal preso politikoekin gobernuak zeraman jokabide lardaskatzailea. Kartzela fronte armatua ireki zuen, eta lehen ekintzen sekuentzia honako hau izan zen:

*- 89.04.08: Herrerako zuzendaria helburu zuen bonba-pakete bat indargabetu zuten.*
*- 89.04.12: Indargabetuak ere Alcalako zuzendaria eta Espainiako Justizia ministroari igorritako beste bi bonba-pakete.*
*- 89.05.08: Mecoko kartzelako inguruan egindako ekintza batean, balaz zauritu zuten kartzelari bat. Gerora hurbildutako polizien kontrako tranpa batean bi polizia nazional hil ziren. Orduz geroztik, estatuko kartzelari guztiak helburu militar gisa hartu zituen ETAk.*

Izugarrizko eragina izan zuen azken ekintza honek Kolektiboarengan. Irakur dezagun, horren kariaz, gau hartan Mecon zegoen kide baten kontakizuna:

*"Gaurko Batzarrean Daroca eta Langraitzko kartzeletan gure lagunek jasotako jipoiak aipatu dira. Badirudi kartzeleroak gero eta harroago dabiltzala Gobernuak eta Estatuak ematen dieten babespean, prepotentzi eternal eta apurtezin baten jabeak bailiran.*
*Batzarra bukatu baino lehen, gure laguna den Fermin Anzizarri bihar goizean Alacanteko espetxera doala esan diote. Hau guztiau arratsaldean gertatu da. Eguna horrelaxe bukatu behar zela ematen zuen, baina eguneko "gertakizuna" gaueko hamar t'erdietan suertatu da, inork espero ez zuen toki eta momentuan: ordu horretan, bakoitza bere zeldan txapatuta zegoenean, izugarrizko eztanda entzun da. "Hori ekintza bat izan da", oihukatu dute. Benetan hunkigarria izan da Organizazioaren ahotsa horren hurbiletik aditzea, sistemaren egitura errepresibo barne barnetik. Horrek morala ematen du.*

*Bi ordu pasatu behar izan dira jazotarikoaz jabetzeko: bi txakur hilik eta kartzelero bat grabeki zaurituta suertatu dira. Zer ondorio ekar dezakeen ekintzak ondo dakigu, zeren, izan ere, larrutik ezagutzen baitugu errehenaren paperak zer suposatzen duen. Aldi berean beldur eta pozaren sentimenduak ageri dira, pozarena nagusitu delarik azkenez."*

Ekinbide selektiboaren garaia amaituta, jomugan jarri zituen ETAk Kolektiboaren aurka gero eta oldarkor ziharduten espetxe funtzionario guztiak.

# Bostgarren epealdia

## 1989-1995




*Ez dut inolako lege-hausterik ikusten sakabanaketan, ezta zuzenbide konparatuaren argitan ere*

Xabier Arzallus,
1989ko abuztuaren 16an.

## **Larrutik** *ordainduko duzue!*

Gurpil zoroan jira-biraka, PNVk eta PSOEk bat-eginik diseinatu zuten politika azken bururaino eramateko urratsak ematen hasi zuen Mugica-Asunción tandemak. Azken honek, kartzela guztiak bisitatu zituen oso epe laburrean. Kartzela-zuzendari, kartzelari eta berauen sindikatuburuekin bilera ugari izan zituen, espetxe politikaren fase berriaren zertzeladak jakinarazteko asmoz. Koartelik gabeko gerra zen mezua, eta tokian tokiko bereizgarria eta suntsitze taktika egite-protokoloa.

Dena dela, zetorren ekaitzaren lehen jasaleak euskal preso politikoen senideak izan ziren. Alcalako ekintza arbuiatzeko deituriko elkarreratze bat burutzen ari zirela, hamarka kartzelarik oldartu zitzaizkien autobusez iritsitako senide zein lagunei, eta  erasoaldi koldarra eta bortitza burutu zuten.



***Erasoan erabilitako harrietako bat erakusten du senide batek. Zaurituak, hamarretik gora.***

Uniformez zein kalez jantzitako guardia zibil, polizia eta espetxe funtzionarioek erabateko inpunitatez harrikatu zuten berrogeita hamabost senide eta lagun zeramatzan autobusa. Zaurituak hamar inguru izan ziren, harrien edota puskaturiko beiren eraginez. Umeak tartean zeuden arren, zakurrek eta beren ahaideek zoraldi batean ihardun zuten, "hil itzazue, hil itzazue" orro eginez.

Jipoi modura hasi eta, hurrengo urteetan, bidaia amaigabeak ordainsari bihurtuta, akaberarik izan ez duen senideentzako zigor-katea izan da, edozeren gainetik, sakabanaketa politika. Badira hogei urtez bi estatuen bideak goitik behera korritu dituzten euskal familiak, irainak eta mespretxuak pairatuz. Halaber, kartzelan dituzten seme-alabak, neska edo mutil-laguna, gurasoak ikusteko parada izango ote dituzten jakiteko dudak barruak janda bidaiatzera kondenturik daude. Inoiz egin den zeharkaldirik luzeena egina dute euskal preso politikoen senide eta lagunek, Marco Polok berak ere amestuko ez zuen tamainakoa.

Izan ere, 1271. urteko Venezian koskortu zen Marco Polok 17 urte besterik ez zituen bere aita eta osabarekin itsasoratu zenean. Veneziako portutik Palestinako Acrera jo zuten aurrena eta handik lurrez Asia aldera abiatu ziren.  Afganistango mendikateak, Gobiko basamortua eta, hiru urteren buruan, Cambaluc-era iritsi ziren, egungo Pekin ingurua dena,  12.000 kilometrotako bidea egin

ondoren. Jakin eta ikusmina ase nahirik Polotarrak batera eta bestera ibili ziren jarraian, 1291n Sumatran itsasoratu ziren arte. Etxera itzultzerakoan Marcok 41 urte zituen. Bidaiak beraz, guztira 24 urte iraun zuen. Bolondreski eginak, nahiak bultzatuta.



***Senideen sofrikarioa izan da dispertsio politikaren fruitu urrietan doilorrena.***

Sakabanaketa hasi zenetik, Euskal Herritik bataz besteko 759 kilometroetara sakabanatuta egon dira euskal preso politikoak. Eta zenbaki hutsak diren arren, kalkulu xume batek lagunduko gaitu aritmetika laiotz honetan. Edozein preso ikusteko joan-etorriko distantzia 1.518 kilometroetakoa baldin bada, urtebeteko bisita guztiak egingo dituela bermatzeak ia laurogei mila kilometro egitera behartzen du. Bider 700 preso? Eta oraindik, bider hogei urte? Mila ehun eta hogei miloi kilometro orotara. Martitz planeta 150 miloi kilometroetara dago, baina dispertsioaren hasieratik gaur arte euskal presoen senideek planeta gorrira ia lau aldiz joan eta itzultzeko adina distantzia egina daukate. Gure ahaideek, ordea, ez zuten Marco Poloren patua konpartitzea aukeratu.



***Martitz planetara lau aldiz joan eta itzultzeko distantzia egin behar izaten dute gure senideek bi estatuen espetxe politikaren erruz.***

## **Kartzelariak.** *Izu-laborriaren bisaia*

Urte bereko bigarren aldian ordura arte puntualak izan ziren jipioiak orokortu ziren. Izan ere, berezko protagonismoa hartu baitzuten kartzelariek, Asunción-ek banaturiko partiturak ongi asko irakurri eta errealitate berrira egokitzen bazekitela frogatzeko irrika bizian ziur aski. Horren ondorioz, erasoen ugaltzeak antzutu zuen denbora luzean txutxumutxuka erabiltzen zuten sasiargudioa: "guk ere bizimodua atera behar dugu, zerbaitetan egin behar da lan, guk ez dugu iskanbilarik nahi", eta antzerako desenkusak. Froga gisa abuztua-abendua bitarteko indarkeriaren zerrenda dugu:

*Abuztuak 3:* Estanis Etxaburu kolpatu zuten guardia zibilek Herrerako laugarren moduloan.
*Abuztuak 4:* espetxe bereko laugarren moduloan kolpeka hustu zuen Guardia Zibilak, euskal preso politiko gutziak lehen modulora eramateko. Hurrengo egunetan ere, jipoi ugari eman zen.



*Abutzuak 7:* José Miguel Latasa gasaz erasotua Herreran.
*Abuztuak 15:* Koldo Domínguez presoa jipoitua izan zen Malagako kartzelan. CSIF sindikatuak zabaldutako bertsioan, ordea, Koldo agertzen da erasotzailetzat.
*Abuztuak 17:* Juan Karlos Lezertua eta Daniel Vidal erasotuak Herreran.
*Abuztuak 19:* Josu Alberdi zortzi kartzelarien artean jipotu zuten Darocako bere ziega barruan, bezperatik isolamendu moduloan zegoela.
*Abuztuak 20:* hamasei preso guardia zibilek makilduta Herreran. Jipoitutako batzuk hauexek

izan ziren: Kepa Suarez, Etxebarria Garcia, López de Bergara, Cuadrado Torres, Joseba Artola, Donato González Merino eta Koldo Hermosa Urra.

*Abuztuak 24:* Juan Karlos Lezertua Rubixo lekeitiarra berriro jipotu zuten Herreran. Astebetean bigarren aldiz.

*Abuztuak 27:* Herrerako sarraskiak ez zuen etenik, eta egun horretan Enrike Agirre Etxeita izan zen jipoitua.

*Irailak 7:* Herreran biluzteari uko egiteagatik, hamalau euskal preso politikoek hartu zuten egundoko jipoia guardia zibilen eskutik. Gasen jaurtiketa eta borrakadak jasan zituzten lehendabiziko moduloan: Antxon López Ruiz, Donato González Merino, Patxi González, Juan Carlos Lezertua, Angel Alcalde Linares, Kepa Suarez Ugarte, Joseba Oleaga, José Ramón Gauna, Eduardo Sanz Lobato, Iñaki Lopez de Bergara, Kepa Reizabal, Elías Fernandez Castañares, Ander Uriabarrena eta Olario Zapatari.

*Irailak 10:* Bisitara joateko biluztu nahi ez izateagatik, beste bederatzi preso egurtu zituen Guardia Zibilak Herreran. Beren senideek salaketa jarri zuten.

*Irailak 17:* Cartagenatik zetorrela Josu Ormaetxea presoa biluztarazi nahi izan zuten Alcalako espetxeko funtzionarioek. Horrek uko egitean, jipoitu egin zuten.

*Irailak 23:* Alcalako presondegian jipoi kolektibo galanta pairatu zuten euskal preso politikoek. Ziegaz ziega, kartzelariak izan ziren erasotzaileak.

*Urriak 2:* Auzitegira eramateko zain egonik, Alcalako zerbituzuburu batek Daniel Vidali eraso egin zion. Arropa urratu eta ordularia puskatu zion.

*Urriak 4:* Beste bost preso jipotuak Herreran. Patio ordua amaitu ostean, biluzik miatu nahi eta, berez ezetzari erantzunez, guradi zibilek kolpatu zituzten Mitxel Turrientes, Angel Gauna, Felix Santamaria, Enrike Letona eta Jose Maria Rezabal.

*Urriak 5:* Luis Maria Alkorta jipoitu zuten Carabanchelgo kartzelariek Tenerifeko espetxera joateko zain zegoela. Egun berean, zelular kotxe baten barruan egonda, Luis Maria Azkargorta jipoitu eta mehatxatu zuten.

*Urriak 7:* Huescako presondegiko zuzendariak, Emilio Navas, Benjamín Cabrera eibartarra eraso egin zuen.

*Urriak 10:* Josu Ormaetxea, Urbinako euskal preso politikoa, gasez erasotu zuten Alcalan.

*Urriak 24:* Iñaki de Juana Chaos erasoturik Alcalá-Mecon.

*Azaroak 9:* Josu Ziganda Oreretako euskal preso politikoa larriki jipoitua Jaengo kartzelan.

*Azaroak 14:* Pontevedrako espetxean zegoen euskal preso politiko bakarra zen Pasai Donibaneko Begoña Sagarzazu Legorbururi, gartzelan bizi zuen egoera tamalgarria salatu

zuelako, bere zeldan sartu eta zortzi funtzionariok izugarrizko jipoia eman zioten.

*Azaroak 15:* Herreran beste lau preso jipoituta.

*Abenduak 17:* Manu Azkarate tolosarra gogor kolpaturik Sevilla 2-ko kartzelan.



Ehundik gora jipoi sei hilabetetan izan zen Argeleko ajea kentzeko gobernuak kartzeletan ezarri zuen botika. Hilabete gutxitan, euskal preso politiko gehienak sakabanatuak izan ziren. Guztiz kemenduta, espainiar geografian zehar kokaturiko hirurogeita hamar kartzeletan banandu zuen Kolektiboa PSOEk. Horrez gain, Afrikako menpelurrak eta Mediterraneo itsasoko irlak ere baliatu zituen barreiatze lanari ikutu koloniala emateko. Kanariar eta Balear uharteak, Ceuta eta Melilla,..., "eskerrak Kuba eta Filipinak aspaldi galdu zituztela!" iruzkina ahotik ahora zebilen ibili kideen artean.

Sakabanaketa nahikoa ez, eta espetxe bakoitzaren barruan hara eramandako kideak isolatzeari ekin zioten. Beren arteko harremana eta komunikazioa moztea helburu zuen araudi zorrotzak ez zeukan zirrikiturik. Alegia, espainiar gobernuak sinetsitasun osoa baitzuen zatitze fisikoari isolamendua erantsiz gero, fruitu heldu gisara eroriko zela EPPKren batasuna. Nork bere zilborrari begira ipinita, banakako *salbazioa* bihurtuko zela ehunka militante haien eginkizun bakarra. Jokabide hori bultzatze aldera, kartzelariek eta zakurrek agindu zorrotzak jaso zituzten: gogor ekitea. Gobernuak erabatekoa izan zen bere esanetan, eta horren ondorio lazgarriak eraso eta astindu modura pairatu zituen Kolektiboak.

PSOEk oso berme zabala zuen espetxe politika aurrera eramateko. Talde parlamentari guztiek eta, batez ere, PNVk babestu ez ezik, kementsu ere lagundu zuen suntsitze estrategia hura zilegiztatze lanean. Justifikazio "ad hoc" eraikita (ETAren tirania pean zeuden preso koskorrak lagundu eta askabidean jartzeko behar beharrezkoa zen "gogorrak" eta "bigunak" bereiztea), xede humanitarioaren izaraz estali nahi izan zuten maniobra, eta ziur zeuden oso epe laburrean Kolektiboaren baitan beldurra inkatu eta erreintsertzio masiboa emango zela. Inteligentzia zerbitzuek hala zioten, eta PNVk aholkulari zerabilen hainbat damutu edota isilmandatarien aburua ere berdina zen. Buruargiak egoteko ergelak ere egon behar.

**_Galder Bilbao Txapi_**

*Txopano edo mittard-a:*
*ez da esan beharrik*
*aislamenduan daudela*
*hainbat kontu barrik*
*duina izan eta*
*ez bota negarrik*
*ziega baten naukate*
*erabat bakarrik.*

*Bakarturik nahi dute*
*euskalduna eduki*
*ez dugu guk bilatzen*
*ez dolu ez erruki*
*iraultzaile arrastorik*
*ezin daiteke aurki*
*nesken ahots goxoak*
*baina oso urruti.*



Dispertsioa eta isolamenduarekin batera, gradu eta espetxe-onuren mekanismoa jarri zuten martxan. Zigorra eta saria bateratzen dituen kontrol sistema honen bitartez, bizi-baldintzetan atzera edota aurrera egiteko aukera eskaintzen zaio presoari. Izan ere, zenbat eta otzanago onartu kartzela barruko aginte-katea eta asimilazio sistema, orduan eta hobeto bizitzeko aukera kausituko da. EPPKri eskaintzen zitzaion aldaerak bi ardatz zituen: Kolektiboarekin loturak haustea eta, unean uneko beharren arabera, borroka armatua gaitzetsi edo Ezker Abertzalearen ildo politikoa kritikatzeko estatuaren estoldetan egosi eta idatziriko agiria izenpetzea. Bizimodua zeharo okertu ondoren, euskal presoak eskema horretara euliak eztira bezala hurbilduko zirela pentsatzen zuena bazegoen egon.

Kolektiboak, aitzitik, beste banda-espektroan iharduten zuen. Uhin-luzera berezia, eskuzabala, korritzen zuen, hitzez zein ekintzez, Albacetetik idatziz utzitako gogoeta honetan antzeman daitekeenez:

*“Ez ahaztu Euskal Herriko egoera politikoa dela gu atxilotuak izatearen kausa, gu espetxetan arrazoirik gabe eta politika arazoak tartekari erabiliz erasotzearen kausa, eta beraz, gatazka honi konponbide politikoa ematen ez zaion bitartean jarraituko dugu borrokan. Ez gaude prest, ez dugu onetsiko eta bidenabar salatzen dugu, beste alderdi askok hartzen duten jarrera lotsagarria eta ankerra, etsaiari errepresioa areagotzeko esku emanez, herriko eritzi nagusia destainduz. Inoiz ez dugu herriaren aburu erraldoi baten aurrean saldukeriarik onartuko, espero dugu herria izango dela jarrera ororen epailerik itzalena.*

## **Duintasunaren** *zaparrada*

Jauzi errepresiboa horren handia izanik, Kolektiboak ekin zion bere berrantolaketari, eta, aldi berean, oldartzeari aurre egiteko borrokaldi berri bat abiatu zuen. Kikildu beharrean, dispertsioak bere

baitan zeraman zama erasokorrak ez zuen lortu euskal preso politikoen kolektiboa saminan murgilduaraztea. Duintasunaren alde matxinatu denak badaki-eta duin bizitzen eta duin borrokatzen.

Txapeo mugagabe bat izan zen erantzuna. Udaran hasi eta urte bukaera arte luzatu zuen EPPKk aipatu txapeoa. Borrokaldi honetan 77 epetxetan sakabanaturiko presoek hartu zuten parte, eta gaixo ziren kide gutxi batzuk salbu, guztiek erantzun zioten sakabanaketa politikari klabe ofentsiboan. Amaitzeko, astebeteko gose-greba egin zuten abenduan, gerora preso ohien eskutik luzapena eta proiekzioa izan zuen. Izan ere, herri mugimenduak mugarri berriak finkatu zituen dispertsioak errepresaliatutako pertsonen defentsan, historikoki Euskal Herriak borroka-usadio bilakatu zuen legez.

Lehen lezioa agudo ikasi zuen gobernuak: ankerkeria eta mendekua azken bururaino eramanda ere, Kolektiboak bizkor erantzuten jarraitzen zuen. Eta bigarren bat ere, bestearen ondorioa: EPPKren duintasun kolektiboa mila puskatan zatituta, duin izateari ez zion utzi, beraz, estatuko presondegi orotara zabaldu zen birusa. Mugica Herzog haserre zegoen, sionismoaren oinarri ideolojikoei erreparatuz gero, irakaspen garrantzitsuak atera zitzakeelako. Sionismoaren aitalehena, Theodor Herzl kazetari eta idazle judu austriarrak "Estatu Judua" bere lanean adierazi zuenez, juduak herri "asimila ezina" dira, eta hau dela eta bere estatua eduki behar dute, bi mila urtetako erbestealdiari amaiera emanez. Ura gure errekarara eramanez, asimila ezineko eta menderegaitz agertzen ziren euskal preso politikoak, eta denbora kontua zen -Euskal Herri osoaren metafora perfektoa tartean- geure helburuak lortzea.


MINISTERIO DE JUSTICIA

Dirección General de
Instituciones Penitenciarias

**CARABANCHEL**
**NORMAS DEPARTAMENTO CELULAR**

- Diana, a las 7.30 horas.
- Recuento a las 8.00 horas; los internos permanecerán durante el mismo en pié al fondo de la celda y correctamente vestidos.
- A partir del Primer Recuento deben realizar la limpieza de las celdas.
- Las camas permanecerán hechas y los internos no podrán acostarse en ellas desde las 8.00 horas hasta las 22.00 horas, con el intervalo de la siesta desde las 15.00 horas -despues del recuento- hasta las 17.00 horas, salvo aquellos que por tiempo les corresponda el tiempo de patio, pudiendo permanecer sentados sobre sus camas.
- Todos los recuentos los deberá pasar el interno de pié y al fondo de la celda, correctamente vestido.
- Los transistores deberán ser usados con su auricular correspondiente.
- Los internos no podrán hablar entre ellos estando en las celdas debido a que para ponerse en contacto de celda a celda tendrían que hablar fuerte y supone una molestia para los demás.
- En la celda únicamente tendrán la ropa imprescindible para el uso diario, material de aseo personal y limpieza, excepto cuchillas y sprays, que serán entregados y devueltos una vez utilizados. El resto del equipo quedará en el almacén del departamento.
- Las compras del Economato se realizarán una vez cada día a las mañanas. El día a que por necesidad no se efectuen las compras por la mañana, se efectuarán por la tarde; estas compras serán de los artículos autorizados.
- Los internos sancionados tendrán una hora de patio en las horas que se designen por los funcionarios del Departamento.
- Los internos clasificados en Primer Grado de tratamiento y los Art. 10 de la L.O.G.P., tendrán una hora de patio por la mañana y una hora por la tarde.
- El tiempo de salida al patio será desde las 8.00 horas hasta que oscurezca, incluyendo las horas de siesta. Se establecerán turnos entre los internos para que sean repartidas de forma equitativa las consideradas mejores horas de paseo.
- Las requisas y cacheos de internos y celdas es obligatorio, tanto a la entrada como a la salida del paseo.
- Los viernes se repartirá el peculio entre los internos que previamente lo hayan solicitado.
- Los turnos de duchas serán Martes y Sábados, alternándose las Mañanas para Planta Alta y Tarde Planta Baja.
- Las salidas al patio se harán en grupos lo más reducidos posibles, pero siempre respetando el horario establecido en cada caso.
- Durante el día sólo podrán permanecer en la cama aquellos internos que tengan informe médico en tal sentido.
- Las comunicaciones seran Martes los Sancionados; Martes y Viernes los de Primer Grado y Arts. 10 y 32.

Madrid, 10 de agosto de 1.989
EL DIRECTOR

***Halako barne araudiak zirela medio gogortu zuten kolektiboaren bizimodua.***

Horratik, hain zuzen, txapeoan zehar mila bider agertu zen Mugica komunikabideen aurrean, protestaldiaren oinarriak gutxietsi eta nardatu nahian. Baina, halere, bere planta harroaren atzetik atsekabea zegoen. Izkutuezina eta suminkorra, borrokaldia bere politikaren flotazio-lerroan kanoikada bat baitzen



Euskal Herri osoan halako horma-irudiz ikus zitekeen.

Presoen artean ematen ez zen etsipen zantzuak eraiki eta, komunikabide lagunen bitartez, argitaratu zituzten lehen hilabeteetan, baina isolatuta egon arren, ez presoei, ez beren senideei, eta are gutxiago Ezker Abertzaleari ez zieten ziria sartu. Borrokaldia gogo biziz ari zen burutzen, eta dispertsioaren abiada baldintzatu zuen.

Borrokaren testuinguruan, erreibindikazio taula bat osatu eta euskal jendarteari eman zion ezagutzera EPPKk. Eskabideak hiru atal zituen. Euskal preso politiko guztien berbatzea, sen eta errealitate ezberdinak izatearren, eta arazo zein dinamika bereziak zituztelako, preso sozialengandiko bereizketa, eta beren eskubideen errespetaraztea. Arlo horretan, hainbat eskakizun zehatz luzatu zituzten, hala nola, osasun eskubidearena, ikasketak egin ahal izateko baldintzak, kontaketak amaitu, miaketetan biluztu behar ez izatea, euskaraz libre eta mugarik gabe hitz egin eta idatzi ahal izatea, bisiten eta idatzizko komunikazioak mugatuak eta grabatuak ez izatea edota defentsa juridikorako oztoporik ez izatea. Halaber, amnistiaren bidean "Euskal Presoak Euskal Herrira" xede gisan lehen aldiz formulatu zen, hurrengo bi hamarkadetan horren indartsu errotu zen lanildoaren aurrekari.

Presoek beraiek agiri historiko batean eman zuten jakitera beren erreibindikazioen zer-nolakoa. Golpe bakar batez erakutsi zuten Kolektibo gisa bizitzen eta borrokatzen jarraitzeko deliberamendua eta, ezina ekinez egina, erabakimen horrekin kontsekuente iharduteko gaitasuna, bai politikoa, bai humanoa. 1989ko abuztuaren 1eko agirian txukun eta ozenki aldarrikatu zuten beren egitasmo integrala:

> *Erratu egin dira, erabat, euskal preso politikook erabiliak izan eta gure Herriaren aurkako instrumentu bihurtzea onartuko dugula pentsatzen baldin badute. Ez dugu onartuko gure senideen aurkako, ENAMeko egituren kontrako eta gure Herri eta abertzalekideen aurkako txantaiarik. Fronte honetatik eutsi egingo diogu Estatuak luzatutako enbidoari bere kontra bilaka dadin: hori da gure betebeharra, eta horretan gaude.*
> *Euskal preso politikook beharturik gaude gure aitzi jaurtitako eraso honi erantzutera, gure egoeraren*

*arduradun bakarrak nortzuk diren jakin araztera, eta heurek hartutako ardurak salatzera. Gure existentzia baldintzen mugen gainetik, gutako askok bizkarrean daramatzagun gartzela zigor urteen gainetik, eta geure burua defendatzeko behartu diguten egoera honen gainetik, gurekin gauzatu nahi den exterminio eta akabera politika salatuko dugu Herriarekin baterako borroka politiko-erreibindikatibo bati ekingo diogu abuztuaren lehen egunetik aurrera, mugagabeko txapeo eran.*

Hau irakurrita, Mugica, Gonzalez, Arzalluz, Ardanza eta, oro har, sakabanaketa politikaren aitaponte edo akolito izan ziren guztiak urtikariak jota sentituko zirela sinisteko ez da fededun amorratua izan behar. Indultoa eta geroko gerra-estrategiak ez zuen pitzadurarik topatuko euskal preso politikoen harresi sendoan.




Aurrerapausu ohargarrien artean, adierazpen, komunikazo eta barne iritzien bitarteko berri bat sortu zuen Kolektiboak urte bereko azken arnasarekin: *Barrutik* aldizkaria. Lehen alea, 0 zenbakia, 1988ko abuztuaren 6an agertu zen, eta Euskal Herriko txoko guztietara iritsi ere. Zeregin garrantzitsua izan zuen hasieratik, Kolektiboaren kohesioa sendotze aldera zein euskal preso politikoen egoera jendarte zabalera helarazteko.

Guztira, sei ale idatzi ziren, hasierako 0 zenbakia eta bost gehiago, azkena 1993ko maiatzan zabalduta. Bertan, hausnarketa, gogoeta, eta agiriekin batera, presoen bizipenek eta idazlanek aurkitu zuten ubide eta adierazpide.

Nolanahi ere, gobernuak ez zuen erraz amore emango, eta sakabanaketaren diseinua baliatzeko urratsak ematen jarraitu zuen. Artifizialki sailkatua, Kolektiboan liskarrak eta tirabirak induzitu nahi izan zituzten. Ordura arte preso guztiak lehen graduan eta bizimodu bertsua izan zuten; erregimen gogorra ezarri eta onurak jasotzea galaratzen zuena, hain zuzen ere. Mugimenduak zetozen, ordea.

Espainiako kartzeletan sakabanatu ondoren, berriz, norbanako bidea eta graduen azenarioa zirela medio zatikatu nahi izan zuten EPPK. Bizi-baldintza hobeak lortzearen truke euskal presoek espetxe baloreetan oinarritutako sistema onetsi eta beren beharretara jarriko zirela uste zuten PNVk eta PSOEk, beraz, bi motako espetxealdia zegoen katalogoan: arbitrarioki aukeratutako hainbat espetxetan, araubide malgua. Besteetan, gehienak nolabait, eskubideak urratu eta exterminiorako logika besterik ez zuen funtzionatzen. Azken batean, triskantza politika alboratu gabe, Kolektiboa politikoki erabiltzeko taktika aukeratu zuten. Damuketa politika indartu eta,

kideak damutu ala ez, damutze eta zatikatze eszenatoki orokorra irudikatzea. Hura zen, ñabardurak ñabardura, betiko asmoa zelofan berritan bilduta.

## **Hamarkada berri baten** *atarian*

Kolektiboko kide izandako Josu Muguruza Madrilen hil eta gero, Angel Alcalde Portugaleteko presoak hartu zuen bere karguaren agiria.



**Josu Muguruza eta Angel Alcalde. Herriak aukeratu, eta hautetsi lanean errepresioaren jomugan jarritako bi euskaldun.**

Izan ere, itxaropenez gainezka hasi zen 1989. urtea doluak eta amorruak zartatua amaitu zen. Hala eta guztiz ere, Herrerako harresietaraino iristerik ez zuen neguko martxa inoiz egin zen handiena izan zen. Kartzelatik zazpi kilometroetara ehunka poliziak altxatu zuten muga-kontrolak ez zituen itzali euskal preso politikoeekiko maitasuna eta elkartasuna. Beharbada horratik, hainbat autobus harrikatu zuten itzulerako bidaian. Zaurituak berriro ere.

Abiaturiko hamarkadak aldiro errepikatzen ziren zenbait ikuspegi eta, gehienbat, hainbat uste zein hautemate aldatu zituen ekinaren ekinaz. Esan nahi dugu, gobernuaren zein ETAren aldetik gatazkaren betikotzea ahalezko aldagai gisa gogoetatu zen estreinakoz. Estatuen nahia eta hautua hura zelako, alde batetik, eta antolakunde armatua etsitzeko prest ez zegoelako, jakina. Ajuria-Eneako hitzarmena sinatu zuten alderdiek sakondu zuten etengabeko enfrentamenduaren lubaki soziala, eta edozein negoziazio politikoren lurperatzaile lanetan ihardun zuten, ETAri su-etenak galdatuz, eta gobernuaren bidegabekeriak errelatibizatuz. Horren guztiaren ondorioz, zigorrak burutik burua bete beharko zituztela barneratu zuten euskal preso politikoek piskanaka

Urte olinpikoa hodeiertzean marraztuta bazegoen ere, sakabanaketaren erronka politikoak ez zion kreditu askorik utzi Pierre de Coubertinen ametsari. Izan ere, antzinako Joko Olinpikoetan,

jokoak hasi baino lehenagoko zazpi egunetan, horiek irauten zuten bitartean eta ondorengo astean Grezian egon zitezkeen borroka guztiak gelditu egiten ziren, atletek eta ikusleek Olinpiarako joan-etorria bakean egiteko modua izan zezaten. Gonzalez, Mugica, Barrionuevo eta Vera beste zerbaitetara zeuden.




***Herrerako martxan bildu zen jendetza eta, Euskal Herrira zihoaztela, bueltan ezezagunek autobusei eraso egitean zauritua suertatu zen lagunetako bat.***

EPPKren heldutasunak fase honetan jo zuen goia, dudarik gabe. Dispertsio politikari itsumustuan aurre egin beharrean, klabe politikoan hausnartu zuen koiuntura hartan zegokion ardura kolektiboaren garrantzia, eta txikitze zein damutze saiakaera berriari, sekulako iniziatibarekin erantzun zion. Estatuaren estrategiari jarri beharreko branka okertu gabe, gakoa zen nolatan berregituratu Kolektiboa, nola bermatu eztabaidarako tresnak, nazio askapenerako mugimendurako ekarpenak zein parametrotan egin, eta hau guztia borrokaren fruitua ziren bizi-baldintza eta eskubideen defentsan edota kideen arteko barne elkartasun arloan milimetro bakar bat ere atzera egin gabe.

Ahalegin handiak egin eta egoera sumingarriak gainditzea ekarri zuen erronkak. Baldintzapeko askatasuna, nahierako gradu sailkapena edota ahulago zeuden kideen babesa kudeatzea ez ziren gai errazak izan, erabilpen politikoak eta maltzurkeriak den-dena kutsatzen zuten-eta. Beste era batera esanda, eskubideak norbanako portaeraren arabera hasi ziren dosifikatzen, beraz, eskubideen errespetatzeari uko egiten zitzaion, arlo horretan zatikako begirunea ez baita existitzen.

Hori zela eta, oinarri politikoak erabili zituen EPPKk sakabanaketari aurre egiteko 90ko hamarkadaren hasieratik. Askotan lortu ez bazen ere, higadura itzelekoa zekarren etengabeko enfrentamenduetan ez erortzea erabaki zuen Kolektiboak. Borrokaren gakoa konbentzimendu politikoen

alorrean egonik, indargune horretan behar zuen egon EPPKk. Hori zen koska, eta ez zuzeneko jarkieraren jokalekua.



***Josu Muguruza eta Angel Alcalde. Herriak aukeratu, eta hautetsi lanean errepresioaren jomugan jarritako bi euskaldun.***

Besteen eskarmentutik ere bazuten-eta zer ikasia. Izan ere, sakabanaketari aurre egiteko GRAPOko kideek hautatu zuten borroka moldearen ondorioak azal bizian uzten ari baitziren jendartearen izudura. Kide guztien berbatzea helburu, berrogei preso inguruk azken muturrerainoko gose greba egin zuten urte hasieratik, eta hilabeteak joan hilabeteak etorri beren ohatiletara lotutako irudien gordintasunak mundu osoan izan zuen oihartzuna. Azal eta hezur, PSOEko gobernukideen taxua salatzen zuten isilka-misilka.

Azkenean, 1990ko maiatzaren 25an Jose Manuel Sevillano GRAPOko kidea Gregorio Marañón hospitalean hil zen, jan gabe 177 egun eman eta gero. Marchenan (Sevilla) jaioa, bere zuzenbide ikasketak bazterrean utzi eta jornalari lana hobetsi zuen borrokolari xumea, halabeharrez emandako elikapenaren biktima izan zen. Orduko justizia ministroak, Múgica ahaztezina, ardura kendu zuen bere bizkarretik berehala:

> *Beste behin ere, heriotz honen arduradunak dira antolakunde terroristaren kideak, haiek eta kanpoan dituzten konplizeak, haiek baitira kontsignak kartzelaz kartzela daramatzatenak. Nolanahi ere, ona da sakabanaketa politika eta eutsi egingo diogu.*

Eztabaida luzea eta sakona burutu zen ondorengo hilabeteetan euskal preso politikoen artean, adimenak eta tinkotasunak pisu berbera izan zuten hausnarketa, non erresistentzia baldintzak bermatzea izan zen lehentasuna, bategite politikoa eta elkartasunari eutsiz eta denon eskura egongo ziren abantailak eta onurak onartu beharko liratekeela ondorioztatzen. Elkartasuna eta eskubideen defentsa izan zen ekinbiderako ardatz bikoitza; ziklo gogor baten borroka lekuko eta, aldi berean, aurrerabide politikoaren funtsa. Honenebestean zegoen zabalduta Kolektiboaren ebatzia, bai Espainiako kartzeleetan, baita Frantziakoetan ere. Kartzela aferak eta abarrekoak espetxe fronte-ko atal gisara ukitu eta barneratu izanak argi askotxo erakusten du Kolektiboran barne osasuna eta koordinazio gaitasuna nolakoak ziren. Harri batek ez du pareta egiten, baina hamarka kartzelatan ereindako haziak hesi abartsua sortu zuen azkenik.




Anartean, espetxe politikaren zamak beste kide bat ebatsi zigun: Mikel Zalakain Odriozola. Bizimodua ateratzeko kamioilari izatea aspaldi erabakita, 1987. urtean atxilotu eta espetxeratu zuten garraio lan "ez ohikoak" leporatuta. Jada berrogeita hamabost urte zituela espetxeratu zutenez, espetxeetako ibilerak ez ziren nolanahikoak izan, nahiko gaiztoak baizik.

Lagun alaia zen, baina pronto bizikoa. Egundoko baikortasuna zuen gauza zailei erreparatzerakoan, eta farias-a ezpainetan gustuko esaldia zuen: "Hau eginda zegok; datorren urtean denok etxean". Espetxeratu bezain laster ohikoa zuen bizioa, tabakoa, joritu zuen. Puroak eta zigarretak, irrati aurikularduna eta bizarra ziren bera identifikatzeko lorratzak. Ourensen egonik jo zion lehen bihotzekoak; hala edo nola atera bazen ere, osasuna aski ikutua geratu zitzaion, eta Martutenera ekartzea onartu zuten. 1990ko azaroaren azken egunean, bihotzekoak jota berriro ere, ospitaleko bidean zendu zen.

## **La grandeur** *de la France*

Kartzela politikaren parametroak oso bestelakoak izan ziren frantziar estatuan. Izan ere, historikoki eta politikoki arras ezberdinak ziren bai bizi-baldintzak bai errepresio kultura, eta berezko sortzapena ezagutu zuen hexagonoan. 80ko hamarkadan zehar, IKko militanteak eta Lapurdin, Xiberuan eta Baxenafarroan edota frantziar estatuan atxilotutako iheslariak bizikide izan
ziren han eta hemen.

**Filipe Bidart.**

*Eta, bat-batean, hemen naiz,*
*Zelda batean bakarrik, ezin*
*Mugituz, nehorat ezin joan,*
*Nehor ere ikusi gabe, deus ez*
*Egitekorik, zaintzaleak atea*
*Noiz zabalduko didan zain,*
*Beha, ene urratsak kondatzen,*
*Orenak minutuka kondatzen,*
*minutuak urraska...*



Kolektibo ezberdinak osatu zituzten. Areago, antolakunde armatuetako militanteek osaturiko bi multzo iraztezinak ziren, harreman mailatan hartu-eman gutxi eta arazo askoz gutxiago izan zituzten jende-taldeak, alegia. Hegoaldetik hanka egindako militanteak zeuden, alde batetik, eta Iparraldeko militanteak bestetik, Iparretarrak iparrorratza zutenak.

1988tik aurrera IKko militante franko pasatu zen kartzelatik. Pariseko gobernuak gogorki jo ostean, hamabost euskaldun joan ziren kartzelara urte berean, bere sorreratik espetxeratutako ia adina militante, hain zuzen ere. Hau gutxi balitz, oso neurri zorrotzak ezarri zizkien batzuei, tartean Filipe Bidart zegoela.

Horrelaxe ematen zigun baigorritarrak bere patuaren berri *Iparretarrak. Erakunde politiko armatu baten historia* liburuan:

> *Lehenik bakartasunean atxiki ninduten bi urte eta zenbait hilabetez. Ez ninduten bakartasunetik atera nahi, ihesaldiaz beldur baitziren. Orduan behartuak izan ziren, kanpoko sostenguari esker, bakartasunetik ateratzera. Gero, horren ordain, zenbait urtez aste guziez ziegaz edo estaiaz edo eraikuntzaz edo kartzelaz aldatzen ninduten, beti neurri bereziak hartuz ene mugimendu bakoitzean. Eta gero, beste lau urtez hola ibilki ondean, zentralean atxiki ninduten denbora guzian, Euskal Herritik ahal bezain urrun, segurtasun neurri bereziekin. Paueko ihesaldia prestatzea aski konplikatua izan zen, beraz Clarivaux-en halako operazio bat prestatzea oraino konplikatuagoa zen.*

Hamarkada honetan Frantziako kartzeletan ere euskal preso politikoen kontrako lehen jipoiak gertatu zirela jakin genuen. Auskalo zergatik, baina ustela eta gezurrezkoa zen artazuritzeko kontu bat oso zabalduta zegoen Frantziako espetxeei buruz: kartzelak beti kartzela, Frantziako kartzelak eta, noski, kartzelaldiak espainiar estatukoak baino aunitz eramangarriagoak zirela. Piskanaka argi egin zen bertoko egorari zegokionean; *bokeras* eta *matoia*, *txopano* eta *mitard*, Puerto edo Fleury hitzek antzerako esanahia zutela ikasita, sinonimoei egurra ematea errazagoa zen.




Nolanahi ere, kartzela jendea suntsitzeko sistemak eraiki duen estugailua da, eta frantziar estiloa ez da, inolaz ere, samurragoa. Jean Groix militante bretoiarekin jarduteko moduak ongi asko erakusten du isileko ankerkeria horren itzal beltza. Izan ere, euskal iheslariei aterpea emateagatik preso hartutako UDBko militante honen kontrako gezurrak eta susmo txar interesatuek bukaera trajikoa izan zuten. Poliziak nahasi zuen Groix-en atxiloketa

egun batzuk lehenago bere sorterrian erail zuten neskatila baten aferarekin, eta funtsagabeko gezur horrek goitik behera baldintzatu zuen espetxeko gogortasunari aurre egiteko Groixek aurkitu zuen indarra.

Ogibidez albaitaria zen bretoi solidarioak ez zuen modurik topatu ezinari aurre egiteko, eta 1991ko urtarrilaren 27an bere buruaz beste egin zuen, ziega barruan urkaturik.



***La Santé-ko presondegia. Miseriaren errepublika.***

Dena den, Bidasoaren bi aldeetan dinamika politikoak bat egiten hasi bezain pronto, kutsu estrategikoa hartu zuen, baita frantziar estatuarentzat ere, bere presondegietan atxilo hartuta zeuden euskal preso politikoen kontrako oldartzea. Jada ez zen nahikoa Madrilek eskatu moldeetan puntualki ihardutea. Frantziako gobernuen jokabideak berezko interesei, eta batik bat, egundoko beldurrari, erantzuten zion. Errepresioak berdindu zituen, nolabait, ETA eta IKren arteko harremanetan 1977tik zeuden koskak eta mesfidantzak.

## **Hausnarketa** *sakona*

Egoera patxadan hartu eta sakon aztertzekoa zenez, 1990 eta 1991 urteak bitartean sekula egin den ahaleginik zabalena egin zuen Kolektiboak, bi estatuen barreiatutako ia laurogeita hamar

gartzeletan burutu baitzuen dispertsioaren gaineko hausnarketa kolektiboak. Inork bideragarri uste ez zuena egin zuen EPPKk, zartagina kirtenetik helduta nork zeukan oso grafikoki islatuz.

Juanito Nazabal etxarriarrak gomutan dauka fase hura, eta zer ondorio afektiboak ekarri zizkion Kolektiboari:

> *Aurreikusi genuen zelako egoeratan egon behar genuen eta zera esan genuen: "orain erakutsi behar zaio etsaiari gure artean eztabaidatzeko gai garela". Dena den, zure bizitzarekin nahi duten bezala jokatzen dute, gure sentimenduekin etengabe jokatzen dute eta nik sarritan esaten dut oso gogorrak egin gaituztela. Gero moldatzen gara baina kaleratzean sintomatologia nahiko gogorra dugu. Sentimendu aldetik ni konturatzen naiz ez naizela sartu nintzena, askoz gogorragoa naiz orain.*

Errepresioaren eraginez, barne gogoetak eta norberaren banakotasunak berezko garrantzia hartzen du, izan ere, lehen Kolektiboaren magalean sendatzen ziren une txarrak eta ahulak nork bere gogotik, nork bere adorea eta motibazioa baliatuz, garaitu behar zituen, Bego Sagartzazuk azpimarratzen duenez:

> *Sakabanaketaz ari garenean, kontzeptu horren barruan erabiltzen dituzten neurri mordoa dago, besteak beste bergizarteratze ospetsuarena. Bergizarteratzearen izenean jipoitu gaituzten, isolatu, komunikazioa kontrolatu, espetxez espetxe ibili, moduloz modulo, ziegaz ziega... mila modutan izorratu gaituzte egunero. Bestetik esan izan da sakabanaketarekin presoaren hausnarketa indibiduala ere bultzatzen dela, gainerako presoek eraginik izan ez dezaten.*

Ageri denez, elementu askok ahalbidetzen zuten eztabaida, baina, modu berean, espetxe politikak berbideratu eta baldintzatu nahi zituen eztabaidaren beraren emaitzak, Kolektiboa atomizatuz tokian tokiko ondorioen ñabardurek euren alde jokatuko lituzkeelakoan. Eta halere, kukuak uste ez zuen tokitik jo zion berriro ere.



Barne hausnarketaren ondorioek 1991ko hondarrean kaleratu zituen EPPKk, *Barrutik* aldizkarian txukun idatzita. Beste askotan legez, ikusi behar dena ikusi ez eta ikusi nahi dena beti begi aurrean izan zuten batzuek, baina ondorioek ez zuten zalantzarako tarterik uzten. Irakurri, bestela, testuari darion determinazioa eta kontzeptu mailako gardentasuna:

> *Beste zenbait gogoetaz gain, argi utzi nahi dugu "banakako tratamendua" goiburuaren izenenan, geure eta geure senideengan hainbat motatako txantaia, presio eta tortura psikologiko erabiltzen dituztela etengabe, gure Kolektiboaren batasuna eta hohesioa hausteko helburuaz, bai halaber indibidualkeria insolidarioa sustatu -ez nahastu gizarte-indibidualtasun banatuarekin- eta gure erabaki eta duintasun*

*politikoa erosten ahalegintzeko, horren truke Kolektiboko gainerakoekiko deslotura eskaini eta norbanakako irtenbide neurriak eskatzea proposatuz, hala nola, gradu igoera edo gartzela-baimenak.*



*Guk uste dugu, ba, neurri horiek ez direla, Asunción, Arzalluz eta Azkarragak hala aurkeztu nahi izan dizkiguten arren, gure preso garenez gerozko eskubideekiko begirunea eta aplikazioak isladatzen dituzten presondegi-neurriak: Euskadin, geure herrian, birbiltzea; erregimena berdintzea, gradu-ezarketari ez; gure izaera politikoa aintzatestea; ez preso sozialekin nahitaez nahasteari; kontaketa iraingarriei ez; eskutizketa libre eta jariakorrarako eskubidea; geure artean euskaraz komunikatzeko eskubidea; ikasketak egiteko bitarteko eta ildo eraginkorrak,... Aldiz, gaurregungo neurriek, tratamendu banakakotu "zientifikoa" -hala dakar arautegiak-, aipatu eskubideak aintzatetsi beharrean, benetan bahituri politikoak garelako errealitatea, guztiok ondo ezagutzen dugun aurkamendu luze eta konpondu gabearen ondorioa berau, ezkutatu eta ezabatzen saiatzen dira.*

*(...) Ez ditzala inork iruntzitara ipini gauzak gorrotoz. Askatasuna ororen gainetik maite eta nahi dugu eta irrikitan gaude, beraz, ahalbait arinen geure senide eta adiskideen artean egoteko, geure bizitza afektiboa berrorekatzeko, geure eguneroko lanbide zereginetan hasteko eta gizarte-bizitza dinamiko eta solidarioa gozatu eta elkarrekin banatzeko. Baina, argi dago, ez edozein salneurritan, ez umilazioaren, damutzearen salneurrian, behintzat ez, gure Herriari bere eskubiderik funtsezkoenak, hala nola, autodeterminazioa, lurralde-berrosaketa, hizkuntza berreskurapena, hots, bere autogobernu erreala ukatzen ari den eta geurregungo aurkamendu mingarria garailerik ez garaiturik gabe, gainditu ez duen errealitate sozial eta politikoan birsartzearen salneurrian.*

Egia esanda, gutxitan idatzi da horren doi eta garbi Kolektiboaren jarrera definitzeko. Ordurako, kristorenak eta bi pasarazita zeukaten arren, xagua harrapatzeko espainiar gobernuak bere etxea ere erretzeko prest bazegoen ere, duintasun testigantzak iritsi zitzaizkigun espetxe guztietatik, kolektibotasuna nork bere baitan eramaten duen pertenentzia sentimendua dela behin eta berriz frogatuz.

## **Kolektiboaren** *ihardute bateratua*

Tomás de la Cuadra ministroak ozenki aldarrikatu zuen: "dispertsioaren eraginez preso terroristen gaineko kontrola galdu du ETAk". Halere, ez ziren bi aste pasa Amnistiaren aldeko Batzordeen bozeramaleek Kolektiboaren ekimen berri bat iragarri zuten arte. Igarle kaskarra Justizia ministroa.

Izan ere, irletan sakabanatuta zeuden kideek abiatuta, irailaren amaieran hasi zen txandakako gose greba bat. Lehen aldiz, batera erantzun zuten bi estatuetan preso zeuden euskal preso politikoek, eta Kolektiboak aho batez erantzun zion bi estatuek garatzen zuten sakabanaketa politikari. Hamar hilabetez luzatu zen protestaldia, txanda bakoitzean astebete baraurik ematen zutela; azken bi txandek esanahi berezia izan zuten: Basauri, Langraiz, Martutene eta Iruñeako kartzeletan zeuden kideena, eta frantziar estatuan kartzelaratuak zeuden berrogeita hamar kideena. Zigorrak, inkomunikazioaren areagotzea eta toxikazio maniobrak izan ziren erantzunaren gakoak.

Alferrik. Euskal Herritik astinduriko elkartasun mugimendu etengabearekin batera, EPPKren dinamika guztiz politikoa zen, eta berezko *feedback*-a zuen: prozesu politikoan eragitea; nazio askapen mugimenduari ekarpena egitea. Deliberamendu horrek ondorio askotxo ekarri zituen, besteak beste, *Senideak* elkartearen sorrera. 1991ko urrian ehunka senidek batzartu eta presoen defentsan aritzeko eraturiko antolakundearen berri eman zuten Donostian. Senide bezala zeuzkaten arazoak konpondu eta, bide batez, beren senitarteko presoen egoera ezagutarazteko sortua, soka luzea izan zuen elkarteak. Kolektiboak hitz goxo hauekin agurtu zuen senideen ekimena:

> *Pozez gainezka uzten gaitu zuen ekimen ausarta honek, tente jarri daitezela Instituzio eta politikari ustel guztiak. Egunero daramaten gizeskubide maskara laister kenduko bait diozue eta diren bezalakoak agertarazi, amaitutzat eman dezatela gezur aroa, gauzak mahaiaren gainean jarriko bait dituzte gaurtik aurrera. Zuek zarete, senide kuttunok, gure abots, begi, entzumen, esku eta bihotz. Zuek, gure zubi, elikagai eta malko sorbalda, pozaren iturri eta maitasunaren sorburu.*
> *Gure borrokaz harro eta zutik sentitzen bagara oraindik, zuei zor dizuegu ia guztia. Horrexegatik esaten genizuen hasieran, pozez gainezka uzten gaituela zuen apustuak, zeren baitakigu gu defendatzearren azken odol ttanttaka ere emateko prest zaudetela, beraz egiazko garantia bilakatu zaretela alegia.*

Alabaina, Kolektiboaren irmotasuna desitxuratzeko ordura artekoak eta bi gehiago egin zituen gobernuak. Nonbait, premiazkoa zitzaion barne kontraesanak asmatu eta ikustaraztea, beraz, hamarka preso eraman zituzten Langraizera, Euskal Herrian egoteak ahalbideratzen dituen abantailak gozoki bezala erabiltzeko asmoarekin.

Horrez gain, gezurren haizagailua martxan jarri eta Kolektiboan existitzen ez ziren eztabaida eta desadostasunak prentsa titularretara eramaten hasi ziren. Arabako presondegia ariketa horreta-

rako probaleku aparta bihurtu zen, eta Manuel Gómez Avilés izan zen antzerki lan horren zuzendaria.



***Langraitzeko espetxea ondoko mendixkatik ikusita. Tartean Zadorra ibaia.***

Dena dela, Langraizera eramandako kideen borondatea nahaspila argitu eta matazaren haritik tiratzea zen. Txandakako gose greba azaroan zegoela, eta xurrumuru interesatuak isilarazteko, Langraizen zeuden preso guztiek gobernuaren plangintza lehertarazi zuen agiria plazaratu zuten, non bat egiten zuten Kolektiboaren eskakizunekin eta egitasmo kolektiboaren partaide eta borrokaren beste katebegi gisa identifikatu zuten beren burua. Suminez eta mendeku gose erantzun zuen gobernuak, eta hurrengo asteetan Salto del Negro, Ceuta, Valencia, Herrera, Ciudad Real eta Ocaña eraman zituzten sinatzaileetako batzuk. Hastear zeuden Kolektiboak jasan behar izan dituen oldartzerik gogorrenak eta zitalenak.

## **Bihotza golkoan,** *errepideak amesgaizto*

Ez dira sekula itsumandoka egindako bidaiak izan, baina euskal preso politikoen senideek erruleta labainkor batean ibiltzen ohi dira, jira-biraka astebururo. Denbora kontua zen, tamalez, errepideak bere zerga ordainaraztea, eta Laudion pausatu zen zoritxarra.

1990eko uztailaren 1ean, Pilar Arsuaga eta Alfonso Isasi, Maribi Ramila presoaren ama eta mutil laguna Pola de Sanabrian (Leon) hil egin ziren. Ourenseko kartzelan bisita egin, eta, etxerako



*Pilar Arsuaga eta Alfonso Isasi.*

bueltan zetozela jasan zuten istripua Laudioko bizilagunek.

Honen aurrean, nork bere baitan gako aldaketa moduko bat sentitzea normala da. Esan nahi da, instituzio estrategiaren lehen araua bere ahalmena erakustea dela jakin arren, bere etsaia -geu- zapaltzeko kartzeleetako giltzak erabiltzea logika likits horretan sartzen bada ere, deshumanizazio gradu itzela onartu behar zaio estatuari geure senideak baliatuko dituztela sinisteko. Eta hala izan da. Areago, sakabanaketa politikaren ardatz zentrala presoaren ingurua (afektiboa, politikoa) kaltetzea da, horrela presoa bera deserrotu eta behea joko duelakoan. Horrekin batera, jakina, indakeriaren erabilera bolo-bolo jasan behar izan du Kolektibo honek. Batik bat, urte haietan, non oraindik lorgarritzat zeukaten euskal preso politikoak makurtaraztea. Errepresio gandutsuaz gain, makila lege bizi eta lekualdatu zituzten 87-97 hamarkadan zehar. Horren lekuko, zifrak eta testigantza beldurgarri bat:

## KARTZELEROEK ETA POLIZIEK ESPETXE BARRUAN EDOTA LEKUALDATZEETAN EMANDAKO JIPOIAK

| | |
|---|---|
| 1987: **3** | 1993: **82** |
| 1988: **49** | 1994: **15** |
| 1989: **70** | 1995: **15** |
| 1990: **33** | 1996: **10** |
| 1991: **9** | 1997: **13** |
| 1992: **51** | 1998: **4** |

*GUZTIRA:* **354 ERASO**

1992ko uztailaren 14, Puerto 2ko presondegian zegoen Manu Muiños pasaitarra gogor jipoitua izan zen bere ziegan. Kaleratu ondoren, eraikuntza lanetan zebilen-eta, lan-istripu larria izan eta zendu zen kideak gorriak ikusi zituen sakabantuta eman zituen urteetan. Borrokalari fina izan zen Manu omentzeko modu asko daude. Guri, bere testigantza transkribitzea otu zaigu. Beste mila modu egonda ere, berak idatzitakoak berezko balorea dauka. Hauxe da orduan zabaldu zuen gertakarien kronika:



**Manu Muiños**

*Egun hartan, goizeko zortzietan edo, araketa baten aitzakitan bi kartzelari bertaratu ziren nire txaboloan. Harro eta probokazio gogoz etorri ziren. Segituan, irain eta mehatxuen artean, dena lurrera bota eta txikitzeari ekin zioten. Ospa egin ostean, ordu erdi bat ere ez zen igaro beste bik lagunduta itzuli ziren arte. Eskuburniak eta kateak zekartzaten, iraindu nituela argudiatuz ohatilan lotuko nindutela esanez. Koltxoia kendu eta beheko xaflaren gainean Jesukristoren antzera jar nedin agindu zidaten. Uko egitean, jo eta jo hasi ziren, eskuburniekin ohatilan lotu ninduten, baina ez zuten nahikoa. Etzanda eta mugitu ezinda egonik, batek ukabilkada zaparrada eman zidan, eta halaxe jarraitu zuen neka eginda utzi zuen arte. Odol putzu batean geratu nintzen, ezpainak eta sudurra apurtuta eta begi bat guztiz itxita. Hiruzpalau ordu beranduago medikua agertu zen, eta egin zuen gauza bakarra izan zen ni askatzeko agintzea.*

Kartzelatik kartzelara egindako lekualdaketak ere gurutz-bide lazgarria izaten ziren euskal preso politikoentzat, guardia zibilek aholku zehatzak jaso baitzituzten *kunda* haietan barruak agindutako guztia egiteko. Eta egiten zuten, gogo biziz eta amorruz egin ere.

Bere gordintasuna dela kausa, pasarte hau jasotzea merezi duelakoan gaude. Horrela jarduten dute Espainaren batasuna defendatzeko ardura daukaten lehen lerroko gerlariak:

*Pako Etxebeste Arozena euskal presoaren aita hil zela eta, Burgosetik Langraizera eraman zuten. Sorterriraino iristeko ezinbestekoa zen Martutenetik pasatzea, beraz, Guardia Zibila arduratu zen bera haraino eramateaz. Bidean, zaintza ardura zuten guardia zibilek kristoren jipoia eman zioten, zeinaren ondorioz begia ubelduta, matrailezurra jota eta buruan soilgune eta marka ugari geratu zitzaizkiolarik. Salaketa jarri bazuen ere, epaileak ez zuen frogarik kausitu eta diligentziak artxibatu zituen.*

## **Ezin ahantzizko** *biurtekoa*

Gonzalezen gobernu erronkak asko eta askotarikoak ziren abagune hartan. Izan ere, Espainiako ospea zein izen ona azpimarratzeko edo, kontrara, lur jota uzteko udara iristear zegoen. Bartzelonako joko olinpikoak ortzemugan egonda, ETA ahalik eta isilen eta zarata atera zezaketeen ezkerreko abertzaleak ahalbait zapalduen egon zitezen planak eta ametsak tartekatzen zituen PSOEk.

Horrela gauzak, sakabanaketaren bigarren faseari eman zioten bide, fisikoki barreiatuta, destinuzko presondegieetako barne errejimena eromeneraino gogortu zutenean. Bi urteren buruan nahiko lan izan zuen EPPKk oinarrizko bizi-baldintzak borrokatu eta bere kidegoaren autodefentsa antolatzearekin. Hil ala biziko gudua izan zen, hura presoak akabatzeko estrategia zen-eta.

Bostehun bat gizon-emakumezkok esku hutsik egin zioten aurre sekula gobernu batek abiatu duen oldartzerik gogorrenera. Kasu askotan gose greba izan zen tokian tokiko lubakiak defendatzeko aurkitu zituzten arma. Ikusi besterik ez dago biurteko haren gose-kronolojia mikatza:

**91-04-10**: *Gose greba Jerez de la Fronteran*
**91-04-15:** *Gose greba Herrera de la Manchan*
**91-05-20:** *Gose greba Granadan*
**91-05-25:** *Gose greba Carabanchelen*
**91-06-15:** *Gose greba Salto del Negron*
**91-06-24:** *Gose greba Puerto II-an*
**91-06-24:** *Gose greba Carabanchelgo emakumezkoen moduloan*
**91-07-13:** *Euskal preso politiko bat gose greban Murcian*
**91-07-16:** *Cartagena eta Badajozen gose greban*

Udara pasata, ugaldu ziren gisa bereko protestaldiak, eta hainbat kartzeletakoak hagitz gogorrak izan ziren, presoek muga-mugaraino eraman baitzituzten autodefentsaren lekukoa.

*-Alcalá-Mecon Unai Paroten isolamenduzko egoeragatik,* ***bi eguneko baraualdia*** *burutu zuten euskal preso politiko guztiek, 91-11-30tik 91-12-1era.*

*- Salto del Negron hamalau kidek bizi-baldintza duinak eskatzeko (modulo berean elkartzea, lagunen bisitak eta gutunak, liburuak eta abar normaltasunez jaso ahal izatea)* ***gose greban*** *91-12-4tik aurrera.*

*- Los Rosales-en (Ceuta) bost preso* **gose greba mugagabean** *sei hilabetez jarraian pairatzen zuten isolamendua eta erasoei stop esateko. 92-03-16an hasi eta 92-04-23an amaitu, zuzendariarekin akordio bat lortu eta gero. Guztira, hogeita hemeretzi egun.*



**Saltoko gartzela zuzendaria zena, Francisco Sanz, Euskal preso politikoen etsai amorratua.**

*- El Acebuchen (Almería) José Miguel Latasak zortzi egun eman zituen* **gose greban***, isolatuta eta errejimen berezipean jarri zutelako. Beste kideen baldintza bertsuetan egon arte eutsi zion, 92-04-13tik 92-04-21ra hain zuzen ere.*

*- Salto del Negron berriro ere, zuzendariak jan egin baitzuen konponketarako emandako hitza.* **Gose greba** *hau itzelekoa izan zen, 39 egun eman baitzituzten jan gabe, eta tentsiouneak, probokazioak eta baita eraso fisikoak ere minutu bakar bat ere eten ez zituztelako. Apirilaren 24an hasita, ekainaren lehen egunera arte luzatu zen hamalau kideen greba: Jesus Mari Zabarte, Jon Tapia, Dani Vidal, Edorta Sainz, Xabier Oregi, Manu Muiños, Joxean Kortadi, Pedro Guridi, Jon Etxeandia, Jon Gaztelumendi, Patxi Cabello, Esteban Esteban, Ander Errandonea eta Iñaki de Juana.*

*- Puerto 2an lau preso, beste kideekin egoteko ezina eta gutxieneko bizi-baldintzen berme eza salatzeko. Egun gutxitan akordio bat lortu zuten. 1992ko ekainaren 10an hasi eta 15ean bukatutzat eman zuten.*



**Saltoko gartzela.**

*- Alacanten, Carlos Reciok bi aste luze eman zituen* **gose greban***, bere isolamenduaren kontra. 92-06-24tik 92-07-8ra arte.*

*-Puerto 2an berriro ere, adostutakoa ez betetzearren. Oraingo honetan bedereatzi euskal preso politikok eta GRAPOkide batek hartu zuten parte borrokan. Orotara, hogeita zortzi egun egon ziren* **baraurik***, 92-07-5tik 92-08-1era.*

*-Valenciako kartzelan Manuel Muiñosek* **gose eta egarri greba** *egin zuen, egun batzuk lehenago Puerton eman zioten jipoia salatze aldera. Bederatzi egunez eutsi zion borrokari, 92-07-20 eta 92-07-29 bitarte.*

*- Murcian Iñaki de Juana Chaos euskal preso izan zen hurrengoa* **gose greban.** *Isolatuta zegoela salatzeko hamabi egun eman zituen jan eta edan gabe, azaroaren 3tik 14ra arte. Iñakik hasi eta hurrengo egunean Murcian zeuden beste bederatzi presok bat egin zuten protestaldiarekin.*

Edozein modutan ere, garai gogorrak izan ziren guztiontzat, euskal preso politikoek ez ezik kartzelariek ere sentitu baitzuten piztutako sugarraren erredura. Azkar ulertu zuten gobernuaren apostuak arroila estu baten ertzean kokatu egin zituela haiek guztiak, hiru urtez jarraian ETAk jomugan jarri zituen-eta. Egoera guztiz gorituta zegoen.

Martuteneko bi funtzionario hil zituen, tiroz. Bonba pakete asko igorri zituen, eta eztanden ondorioz beste kartzelari bat hil zen (Sevillan), beste baten ama ere bai (Granadan) bere semeari bidalitakoa irekitzerakoan, eta, azkenik, DGIPko goi-kargu bati bidalitakoa indargabetu nahian ziharduten hiru artezilari hil ziren Madrilen. Horrez gainera, Sevillako bi preso eta bisitari bat ere zendu ziren lehen aipatutako leherketaren ondorioz. Malagako espetxearen aurrean bonbakotxe bat eztandarazi zuen erakundeak eta hamar inguru izan ziren, harat honat, espetxe ezberdinetako funtzionariori bidali zizkien gutun eztandagarriak. Batzuen ustez lehia gogorrean aritu ziren, baina enfrentamenduaren logika hartan estatuaren errepresio estrategia zegoen lazturaren sorburuan.

## **Sakabanaketa galbidean.** *GALen bidea ireki?*

Kolektiboak erakutsitako osotasuna eta kemena ukaezinak ziren, beraz, DGIPko propaganda arduradunek, PNVk eta Atutxak edo gobernuaren agindupeko komunikabideen toxikazio trauskilek ez zuten EPPKren erabateko garaipena lurrundu. Honenbestean zegoen barneratuta estrategiaren porrota, PSOEk beste alternatibak aletu zituela, besteak beste, gerra zikina kartzela barrura eramatearena.

Txikierdiren kontrako aurrekaria bazegoen guztion gomutan, 1986an Baionako kartzelan burutu zen hilketa saiakera espainiar gobernuaren enkarguz egina zegoela baitzirudien. Bost urte beranduago, berriro jo zuten preso sozialengana euskal preso politikoen Kolektiboaren kontrako erasoaldiak egin zitzaten. Alcalá-Meco eta Puerto I lekutu ziren proposamenak, eta salbuespenik gabe FIES fitxategian sailkatutako preso sozialen parte hartzearekin egiten saiatu ziren, sistemaren aurka jo eta ke ibilitako jende mukerra izanik, zepotik libratzearren proposamena onartuko zutelakoan.

Oker handia izan zen. Beren izaera erreboltaria eta euskal preso politikoen jokabidea batu ziren, sarri askotan, muturreko egoeretan, bai isolamenduzko moduluetan, bai preso sozialen eskubideen defentsan gure kidegoak beti erakutsi duen jarrera aktiboaren argitan. Beraz, "ETAko presorik entzutetsuenak garbitzeko" eskaintzei muzin egitea ez ezik, gerra zikina berpizteko ahalegina publikoki salatu zuten preso sozialek. Ekimena bertan behera geratu zen preso horiek izan zuten

ausardia eta kontzientziari esker. Horratik, liburu honetan beren izenak agertzea eskerroneko gutxieneko keinua den aldetik, Luis Rivas Dávila, Manuel Fernandez Burgos, Javier Avila Navas eta Landelino Iglesias Martínez aipatu nahi ditugu bereziki, kartzelan jarraitu edo kalean egonda, Euskal Herri osoaren adeitasun eta begiramena merezi dutelako.

Saiakera horien atzetik Kolektiboaren aspaldi ezagunak ziren eta orriotan behin baino gehiagotan aipatuak izan diren kartzelariak zeuden, Luis Rivasen testigantza honetan antzeman daitekeenez:

> *El 21 de diciembre de 1990, cuando salía en conducción de Alcalá-Meco, me entraron cuatro guardias: un jefe de servicios llamado Valeriano; tres funcionarios llamados Miguel Angel, Isidoro -apodado "Estefania"- y Julian Manuel Hernández Huerte. Todos ellos estaban de guardia ese día; estas fueron sus palabras: "eres tonto, Dávila, tanto luchar por nada, nosotros te podemos ayudar si tu colaboras con la DGIP". Yo dije: "¿cómo?, y me contestaron que cuando yo quisiera hacer un secuestro me darían las llaves con lo condición de que debía ejecutar a los presos de ETA más influyentes de la organización. Que a mí nada me pasaría y que la DGIP me daría todo lo que yo les pidiera. Que a los etarras les iban a echar a la calle y a nosotros, los comunes, no. (..) Me dijeron que me lo pensara, que si me ponía de acuerdo que avisara al director de Herrera de la Mancha, Jesús del Rey Reguillo.*

## **Damuketa politikaren** *porrot estrategikoa*

Hobe da laido laburra, ezen ez damu luzea. Esaera zaharrak dioen bezala, damutuen bila gobernu ezberdinek egin zuten bidaia luzeak ñabardura asko izan zituen, besteak beste, hainbat kide ohiren nekea eta hutsegitea. Laidogarria ez den giza peaje hori, lotsarena, ez pasatzeagatik estatuak ehunduriko amaraunak harrapatu zituen urte luzez, suntsiketa politikaren zerbitzuan txotxongilo gisa erabiliz.

Izan ere, kide ohi batzurekin azpijoko ugari ezagutu genituen 92-93 urteetan. Kolektiboak sendo erantzun zion trikimailu berriari, eta sare pozoindu horretan erosotasuna aurkitu zuten kideen jarrera are sendoago kritikatu zuen. Bere historian lehen aldiz izen-abizen eta guzti salatu zituen gobernuaren gozokia hartu eta ordainean ia egunero prentsan agertu eta Kolektiboaren aurka edota ezker abertzalea puskatu nahian ahalegintzen ziren damutuak. Barrutik agerkariko 5. zenbakia arras argigarria izan zen:

Berehalako kaleratzearen truke edo, gehienetan, Kolektiboko gainerako kideei ukatu egiten zitzaizkion zigor kentzeak eskuratzearren, ikuskizun negargarriak eman zituzten hainbat kide ohik; are penagarriak jakinda onura haiek bilatzeak Kolektibo osoari kate berriez lotzea esan nahi zuela.




**Presos excluidos del Colectivo de presos políticos vascos:**

Sabino Alava García
Martín Apaolaza Azkargorta
Guillermo Arbeloa Suberbiola
Kandido Azpiazu Beristain
Patxi Barrenetxea Varela
Ramón Bidaburu Otadui
Sabino Egurbide Pikabea
Isidro Etxabe Urrestrilla
Javier Gallego Burguete
Xabier Gamarra Valdivieso
Eleuterio Imaz Izagirre
Juan José Iradi Lizarazu
Mikel Mendiola García
Josu Murgizu Bakaikoa
Iñaki Olabarri Isasi
Agustín Sarasketa Escribano
Jon Urrutia Aurtenetxe
Ramón Zapirain Telletxea
I. Zuazolazigorraga Larrañaga
Jokin Zubillaga Artola

**Presos que nunca han pertenecido al Colectivo de presos políticos vascos:**

Gregorio Arregi Zinkunegi
Mikel Aznariz di Castillo
Mª Victoria Becerra
Xabier Bereziartua Etxaniz
Alfonso Briones Goikoetxea
Igor Casas Nuñez
Mª Carmen Egiluz Villanueva
José Luis Gallego
Pablo Gómez Ces
Pedro Mª Gorospe Lertxundi
Jesús Guergue
Pako López de Sosoaga
Josu Lorenzo Almandoz
Eneko Markina Etxebarria
Imanol Murua
José Mª Suescun
José Ramón Treviño
Aitor Zumarraga
Unai Zumarraga

***1993ko maiatzaeren alea eta bertan argitaratutako oharra.***

Gómez Avilés-en jukutriak eta azeri lanak ipurdi agerian utzi zituen damutuen ustezko arrazoiak, kideei edota bere inguru afektibo-politikoari argudio batzuk ematen zizkioten bitartean, mintzalekuetan hartutako grabazioetan ENAM edota Kolektiboa bera bost axola zitzaizkiela garbi asko antzematen baitzen. Urrutia eta Etxaberi grabatuta eta komunikabide guztiek zalaparta handiz hedatu zituzten elkarrizketak ezin adibide argigarriagoa izan zen. Legitimitate apurrik ere ez zuten kausitu handik aurrera. Begoña Sagarzazuren ustetan, benetako arrazoi politikorik ez zegoen kide ohi haien portaeran:

> *Ez dut ezagutzen arazo politikoa medio, Kolektibotik atera den pertsonarik, edo Kolektibotik atera eta espetxean borrokan jarraitu duenik. Normalean Kolektibotik ateratakoak ateari begira egon dira... Kolektiboa irekia da, nahi duena sartzen da eta nahi duena atera, baina gero espetxe batean zaude eta espetxeari aurre egiteko egunero dauzkazu arrazoiak eta espetxeari aurre egiten badiozu, ez dizute kalera ateratzen utziko.*

Jose Antonio Torre Altonaga "Medius" ere iritzi berekoa da:

> *Behin Kolektiboan garrantzitsua izan zen pertsona bat etorri zitzaidan negarrez, nekatua zegoela eta lehertuta. Bera ez zela sekula ezker abertzaletik aldenduko baina ezin zuela espetxean. Nik esan nion, ateratzeko ordainsariren bat ere ordaindu behar izango zuela.*

Sagarzazu eta Juanito Nazabal preso ohiek damutuen jokabidea ulertzeko prisma interesgarri eskaintzen digute ondoko gogoeta honetan, azken batean klabe humanoa baitago ihestearen oinarrian:

*Damutua oso egoera zehatz batean damutzen da eta testuinguru batean erabilitako pertsonak dira.*

> *Zelanbait, neurri batean uzten diozu zu izateari, garrantzitsua zara politikoki erabilia zaren neurrian (...). Kalean damutu batekin elkartu naiz eta esan dit ez duela behin ere gure aurka egin, nekatuta zegoelako egin zuela. Nik esan nion ulertzen nuela baina ez nuela onartzen. "Hire laguna izango nauk baina beti kritikoa izanda", esan nion.*

Saiakerak saiakera, arnas luzeko ekinaldia burutu zuen Gonzalezen gobernuak damutuen bila 1995 urtera arte, beti ere euskal preso politikoak banakotasunaren gurpil zoroan sartu nahirik.

Asko egonda ere, batzuk dira aipagarriak. Esaterako, Castelló-ko kartzelan zeudela Kubati eta Latasa buruz buru itaundu nahi izan zituen Gómez Avilések, presoen haritik tiraka negoziazio espektatiba txoroak elikatzeko asmoarekin. Berdin frantses estatuan, non Cathala inspektorearen bitartez *zundaketak* egin nahi izan zituzten *Azkoiti* eta Pakito presoekin. Zer esan Egibar eta Urbiola jelkideek Jesus Mari Zabarteri egin zioten bisitaz!...

Bazterrak nahasteko eta, batez ere, Kolektiboaren batasuna eta ekite bateratua arrailtzeko saiakerak izan ziren guztiak. Salbuespenik gabe. Eta zenbat eta handiagoa izan bere proposamenen lurjotzea, orduan eta desesperatuagoak ziren ildo beretik jotzeko ahaleginak: borroka armatua publikoki errefusatzearen truke askatasun eskaintzak, Asunción-en bisitak kartzeleetara, bere presentzia inposatuz erreakzioak neurtzeko, hainbat preso eta abokaturen arteko elkarrizketen grabazio eta hedatze ilegala, edota Langraiz erabili *susmagarrien* erakuslehio modura, hara eramatea soilik presoa susmopean jartzea balitz bezala. Borroka uztearen aldeko jarrera zuela aditzera ematea, nolabait esateko. Mila amarru eta ondorio bakarra eta nabarmena: damutze estrategia garaitua zegoen. Kolektibotik pasatu baldin badira bost mila gizon-emakumezko inguru, berrehun izatera ere (poli-miliak barne) ez dira iritsi gobernuen gozokia jan egin dutenak. Urik gabe, jakina, errotarik ez dabil.

Fernando Irakulis preso ohiak oso gogoeta pausatua egiten du horren guztiaren kariaz, damutze estrategiaren amaiera data-edo finkatze aldera:

> *Otu zitzaizkien astakeria guztiak egin ondoren, azenarioaren amarrua eskainita ere saiatu ziren gu makurtarazten. Areago, saiakera horretan gutako asko Euskal Herriko edo inguruko kartzeletara eraman eta "erregeak bezala" sentiarazi nahi izan gintuzten 1992-96 urteetan, zapore gozoa dastatu eta bizimodu moketadun hartan erosotuko ginelakoan. Kontrara, gozatzekoa noski gozatu genuela, baina kolektiboki pentsatu, jardun eta erantzunez jarraitzen genuela ikusi zutenean, damuketaren zikloa itxi zen. Ondorioztatu omen zuten jai zutela gurekin, edo hobeto esanda, edozein baldintzatan gure barne kohesioa itzelekoa eta apurtezina zela ikusirik, filigranetarako tartea ez zegoela deliberatu zuten. Eta orduz geroztik..., norbaitek entzun al du zeozer Kolektiboaren baitako zatiketaz edo antzeko pitokeriaz? Ezer saltzen ez duten dendei bezala gertatu zitzaien: pertsiana jaitisi eta negozioa itxi egin zuten.*

## **Ziklo baten amaiera.** *Mehetasunik gabe, gerra*

Bidarteko atxiloketekin batera ETA eta ezker abertzale osoa kuadrilaterotik kanporatuko zituela uste osoa izanda, PSOEk ikusi zuen bere burua gero eta larriago. Alde batetik, bai erakundeak bai Kolektiboak suspertu eta ofentsibarako ahalmena erakutsi zutelako. Bestetik, gobernuaren usainean iharduten zuen PPk euskal preso politikoei *eskainitako benefizio eta damutze aukeren* letania suntsigarria behin eta berriro errepikatzeari ekin ziolako. Indar korrelazioa begien bistan aldatzen hasia zegoen; agian horregatik PNVk jarri zituen bi hankak kontrako ibaiertzean, dispertsioaren kontra hitz eta pitz, eta guztion giza eskubideak aldarri.




Gonzalezen azken legealdian damutuen lorpena izan zitekeen astintzeko ikurra, baina emaitzak, beren urrian, hain ziren kuestionatuak, non PSOE irrigarri geratzeko bai- no ez zuten balio izan.

Frantzian, lehengo lepotik burua, gorantza zihoan euskal preso politikoen aurkako presioa, ixila askotan baino gero eta erasokorragoa oro har ikusita. Pello Mariñelaren etxarriarra izan zen gogortze instituzionalaren gilotina hartan hil zen hurrengo euskalduna.

Sakana aldeko gazte hura drogak harrapatuta bizi izan zuen garai batean. 1988an, Guardia Zibila bera atxilotzera joan zenean, Ourensen zegoen, desintoxikazio etxe batean gordeta. Handik hanka egin eta klandestinitatearen bidea aukeratu zuen. Izan ere, sasitan zegoen bi urte beranduago, frantziar poliziak Bretainian atxilo hartzerakoan. Hala eta guztiz ere, IHESAk jota zegoen orduranko. Euskal Herriko horrenbeste gazterekin gertatu bezala, heroinaren arrastoak maarkatu zuen Pelloren patua. Kartzelan, osasun egoera penagarriek azkartu zuten luzea edota egonkorra izan zitekeen gaixotasunaren prozesua. Elikadura toxikazioak, isolamenduzko erregimen zitala, bisita gehienak debekatuta, hiru hilabete luze eman zituen min handiekin, La Santén bertoko zuzendariak eta arduradun medikuek jaramonik egin gabe. Eritegira lehenago, eta Fresneseko hospitalera geroxeago, hara eraman zutenerako neumoniak jota zegoen, eta birikek ez zuten behar adina indar bizirik segitzeko. Maiatzak hamabost zituela hil zen.

Kolektiboa ahul agertarazteko gaitasun eza eta, bidenabar, Amnistiaren aldeko Mugimenduak sakabanaketari behak jateko irudimena osatu zuten EPPKren inguruko zikloaren hondarra.

"Euskal Presoak Euskal Herrira" leloa eta berau babestuko luketeen milaka eta milaka euskal herritarren kontzientzia sendotzen ari zen-eta.




Beraz, estatuen enegarren apostu honek ere porrot egin zuen. Orduz geroztik, beste parametroetan neurtuko litzateke espetxe politika, EPPK errealitate puskatu ezina zela jakinda. Ildo betetik, sakabanaketaren zentzugabekeria jendarte zabala blaitzen ari zen apurka apurka. Bere bultzatzaileen ahotik, PNV kasu, entzundakoak entzunda, politikoki erabat indargabetuta geratu zen giza eskubideen kontrakoa eta antzua zela esatearekin batera. Euskal Herrira ekartzeko premia politikoa eta soziala mahai gainean, eragileen ajendan ezinbesteko tokia edukiko zuen, handik aurrera, euskal preso politikoen kuraiak.

# Seigarren epealdia

1995-1997



*Presoak berriz batzea, ETAren helburu nagusia da, Espainiako Gobernuko lehendakaria hiltzearekin batera*

Fungairiño fiskala

*A por ellos*

Victoria Prego,
Sasikazetaria

# **Herritik** *Herrira*

1995ko hastapenak ez ziren kazetarien erredakzioetan alfer orduak izateko moduan pasatu, urtarrilean bertan ETAk hil baitzuen Gregorio Ordoñez, PPren presidentea eta Gasteizko legebiltzarreko parlamentaria. Horrez gain, GALeko afera zahar guztiek petrolio mantxa geraezina bailiran PSOEren sinesgarritasuna hutsaldu egiten zuten, espainiar eskuindarren agindupeko kazetal estrategia adimentsua jarraiki. Martxora iritsita, Lasa eta Zabalaren gorpuzinak agertu ziren Alacanteko kanposantuan, Busot herriko zulo kareztatu batean urteak eman ondoren. Sumina eta lazdura bazter orotara iritsi ziren hartan, Aznarren kontrako auto-bonba baten eztandak politika mundua astindu zuen inoiz ez bezala: Carrerorena egin zuen erakunde berbera ahalmentsu agertu zen mundu osoaren begietara beste espainiar lehendakarigari herioaren sega gertutik erakusteko.

Apirilean geundela, ETAk bere gain hartu zuen "Euskal Herriaren zapalkuntza bermatzen duten etsaien ordezkari gorenetako baten kontrako ekintza": Baina, agiri berean, negoziazio politikorako eta, batik bat, Euskal Herria eta espainiar estatuaren arteko arazoa bideratzeko proposamena eman zuen jakitera. *Alternatiba Demokratikoa* delakoak zer esan handia eman zuen aurrerantzean, eta egun, oraindik, indarrean dirauen gatazkaren korapiloak askatzeko gida aproposa da, ezbairik gabe.

Dena delarik ere, bi estatuen kartzeletan Kolektiboko kidegoa ez zen koiunturaren ikusle soila. Inoiz baino dinamikoago, 547 kide biltzen zituen EPPKk urrats berriak jarraitzen zuen ematen, dela bere izaera eta bokazio politikoa nabarmentzeko, dela tokian tokiko lorpenak blindatzeko ahaleginean.

Maiatzaren 28an udal hauteskundeak egon ziren Hego Euskal Herrian eta, zerrendetan zihoazen euskal preso politiko askok merezi zuten beren herrikideen konfidantza. Hala, zinegotzi hautatu eta udal korporazioak sortze udalbatzan parte hartzeko zeukan eskubidea baliatuz, sorterriraino eraman zituzten hemeretzi kide. Handik lau urtetara, EHko zerrendetan han hemenka agerturik, askoz gehiago izan ziren herri borondateak ordu batzuk sikiera aberriratutakoak. Parlamentari bat Nafarroako legebiltzarrean eta 29 zinegotzi. Nola mozorrotu, orduan, euskal preso politikoekiko eta, garrantzitsuena, beren izaera osokoarekiko herri atxekimendua?

ETAren suspertzea, ELA-LABen arteko ekintza dinamika bateratua, Maroñon lurperatu zen mugimendu bakezale instituzionalaren ahultze estrategikoa edota Ezker Abertzalearen irmotasuna izan ziren, besteak beste, aro berri baten geltokiak. Julio Iglesias Zamora enpresariaren arrestatzea zela eta saiatu zen itotze taktikaren porrotak markatu zuen, nonbait, PSOEren gainbehera, "Euskal Herria Askatu" dinamika medio burua altxatu ez ezik harrotasunaren langa igotzea ere erdietsi baitzuen Ezker Abertzaleak. Botere faktikoek erreleboaren beharra urjentziaz plazaratu

zuten, eta bibote oraindik txingortua zuen Jose María Aznarrek ekarri zuen PPren errepresio marketina.





Ezkerretik eskuinera eta goitik behera: Aritz Arnaiz, Andoainen zinegotzia 1995an; Kristina Gete, Donostian zinegotzia 1999an; Gorka Fraile, Durangon zinegotzia 1999an; Lurdes Txurruka, Soraluzen zinegotzia 1995an.





## **Txeke zuri bat** *Sabin Etxean*

Jakinak ziren jelkideen ekinak eta esanak euskal presoak eta sakabanaketari buruz. Espetxe politika sustatu zuten, eta Juan Maria Atutxaren bitartez urratsak eman zituzten Kolektiboaren inguruko prentsa toxikazio ahaleginetan. EPPKk ez du sekula ahaztuko Areatzako poliziak esandakoak: "Itxuraz normalak diren familiak, 16 urteko alabak kartzeletara eramaten dituzte presoekin bisean bisak egitera".



Eta, irainez haratago, are barkatu ezinagoak dira urte luzeetan euskal preso politiko eta beren senideen kontra PNVk burutu zituen etengabeko erasoaldiak: Jose Antonio Garbi del Río eta beste damutuen erabilera Kolektiboa zigortu eta errepresio estrategian sakontzeko; hainbat kideren senitartekoak medio gezurrak barra-barra esatea hurbilketa eta onura selektiboak lortzeko; euskal preso politikoen iritzia kutsatzeko toxikazio eta zirikatze kanpainak, arlo honetan Antton Etxebesteren gogoetak Lakuatik kartzela guztietara bidaltzean gailurrera iritsi ziren. Gisa guztitakoak izan dira, halaber, sakabanaketa justifikatzeko bozeramale jelkideek emandako argudioak. Eta, halere, PNVren ardura nagusiak espainiar estatuko alderdi nagusi bakoitzarekin ehundu dituen izkutuko itunetan daude. Izan ere, PSOErekin sakabanaketa edota gerra zikina oinarri zuen estrategia adostu zuen bezala, PP Moncloara iritsi baino lehenago hitzartuta zuen Jose Maria Aznarrekin hurrengo urteetan neofrankisteekin batera garatuko zuten sarraskia. Azken ofentsiba. Ardanzak publikoki onartu du, gainera, lau urte, gehienez seiko epea eman ziotela PPri "beren ustetan egin beharrekoa egin zezan, nahiz eta gu bat ez gentozen". Laissez faire ildo horretatik eratorritako makurkeriak, guztiak eta salbuespenik gabe, Sabin Etxeko jauntxoen konplizidadearekin pairatu behar izan dituzte EPPKk eta Euskal Herriak.

## **Azken oldarraldiaren** *testuingurua*

Lehenik eta behin, espetxeetako oldarraldi errepresiboa bi estatuetan eta nazioartean jorratzen zela esan beharra dago argi eta garbi. Ordurako, frantziar gobernuak ez zituen begiratzen

independentziaren aldeko borrokaren atzera-aurrerak ondoko estatuan jazotako arazo gisa, bere izaera zentralista eta nazio arkitektura mehatxatzen zuen kezkabidea bezala baizik. Hipotesi hura aintzakotzat hartuta, berezko lerro errepresiboa diseinatu zuen ezkerreko independentismoaren zutabeak zerratu eta, ahalbait arinen, lurrera botatzeko. Espetxe politika izan zen ardatzetako bat, eta lehen aldiz hartu zuen espainiar gobernuarentzat lagungarri hutsa ez ez garrantzia.



***Fresneseko gartzela: isolamenduaren paradigma.***

Jaén, Carabanchel, A Coruña, Albacete eta Espainaiko hamaika presondegitan borroka zeuden gutxieneko bizi baldintzak lortzeko, baina Fresneseko egoera horiek guztiak bezain gogorra zen, bertan zeuden kideek muturreko neurriek jasaten baitzituzten aspalditik: isolamendua, ezegonkortasuna, zikinkeria, matoien basakeria eta edozer gauza egiteko (liburutegia, kiroldegia) debekuak. Egoera honi aurre egiteko, gose greban hasi ziren apirilaren 22an. Handik astebetera, frantziar estatuko hamabi kartzeletan zeuden hirurogei euskal preso politikoek bat egin zuten ekimenarekin. Chirac-ek eta Jospin-ek, RPR eta PSFko buruek, berehalakoan jabetu ziren errealitatearen taxuaz: egoskor eta tinko, EPPKak ez zuen kontuan hartzen Bidasoan ezarritako muga artifiziala eta, administrazio ezberdinen jukutriaren pean egonda ere, Kolektiboa bakarra osatzen zuten ehunka borrokalari horiek elkartasuna zutela urrezko arau.

Frantziar estatuan kartzelaratutako Kolektiboaren eskakizunek bi aldetara egiten zuten so: sakabanaketa, isolamendua eta murriztapenen kontra, eta beren estatus politikoaren errekonozimenduaren alde. Beti ere, aurkia eta ifrentzua. Maiatazaren 15ean akordio bat lotu zuten Fresneseko

kideek bertoko zuzendaritzarekin. Helburuak lortu ziren, eta Kolektiboa arrunt indartuta atera zen ataka hartatik.

Edozelan ere, sakabanaketaren porrot politikoa nabarmentzen hasten denean, Euskal Preso Politikoen aurkako erasoa sakondu eta azken urteetan berez latzak eta mingarriak ziren bizi baldintzak estutzera joko du etsaiak. Euskal Herriak bizi duen salbuespen egoera espetxeetara eramanez: presoen bisitetarako trabak eta mugapen berriak ezarriz; komunikazioen murrizketak eraginez; espetxe barruko jardueretarako ukapenak; isolamendu eta bakardade egoeren sakontzea. Batez ere, isolamenduaren dimentsioa ikaragarri handitu eta zabaldu zen. PSOEk, Gonzalezen azken gobernua kili-kolo zegoela, bere espetxe plangintza desegiteari ekin zion, maniobrarako tartea erabat galduta, baina 1995ko urrian egindako argazki estatiko batek oso irudi kezkagarria ematen zuen. Sozialisten azken gobernuak baldintza penagarrietan utziko zizkion kartzelak PPri.




Euskal preso politikoei zegokienez, lau inkomunikazio maila antzeman zitezkeen. Lehena, isolamendu soziala deiturikoa, presoa sakabanatu, inguru sozial zein kulturala errotik erauzi eta bisita, eta gainerako komunikazioen murriztapen, kontrol edota debekuen ondorioz eragindakoa da. Orduan espetxeetan zeuden 541 kideek pairatzen zuten. Bigarrena, talde isolamendua zen. Alegia, Kolektibotik bereizterakoan edo, kartzela bakoitzean, modulokako barne dispertsioa ezartzerakoan eragindakoa da. Baldintza horietan 77 kide zeuden bi estatuetan. Sailakapenaren araberakoa dei diezaiokegu hirugarren motari, "banda armatu" edo "gaizkileen elkarte"-ko kide izatea egotziz gero, administrazioek besteengandik aparte eta bizi baldintza berezietan (beti gogorragoak) kokatzen baititu presoak. Eta, azkenik, erabateko isolamendua.

Latzenetan latzena, hilabeteak eta urteak ere luza daitekeen isolamendu mota hori hamarka kide ezagutu dute urteetan zehar, eta kartzelariak izan dira behatu zezaketeen giza espezie bakarra. Juanjo Zubieta, Monterroxon, Benjamin Ramos, Berlinen, Maite Rojo, Melillan eta Josepa Ernaga, Puerto de Santa Marian ziren isolamendu gradu gorena jasaten zuten kideak.

Bizimodu petral horren ondorioz beste bi euskal preso politiko hil ziren epealdi hartan. Lehena, Javi Gorostiza *Divino*, bilbotarra. Bigarrena, Juan Jose Etxabe *Handixe*, Arrasateko iheslari eta







militante historikoa. Gorostizak eztarriko minbizia zuen arren, mediku kartzeleroen utzikeriak izugarri atzeratu zuen diagnostikoa, eta asmatu zuteneko berandu zen. Kaleratu ostean, bere bizitzaren azken urtea hospitalean eman zuen, harik eta 1995ko ekainaren 17an hil zen arte.

Etxabek ia hirurogei urte zeuzkan zendu zenean. Sasoitsu eta indar handikoa, BVEk 1978an lortu ez zuena, azken espetxealdiak bai, 1996ko maiatzak hilabeterako sartu baitzuten kartzelan Frantzian, ohi bezala baldintza kaskarretan, eta horrek, isolamenduak, hezetasunak eta egoeraren makurrak betiko kaltetu zuen bere osasuna. Hala, libre geratu eta gutxira hil zen Urruñako bere etxean, bihotzekoak jota. Urtebete geroxeago modu bertsuan zendu zen Jean Louis Maitia, euskaltzale eta abertzale ezaguna.

Heriotz zigorrak isolamendu izena zuen, eta pertsona ahultzea, militantea aztoratzea zuen helburu. Azken finean, taldeak fisikoki zein psikologikoki ematen digun babesa kenduta, behar primarioen araberako loturek talde lotura ordezkatzea nahi zuten, indefentsioak eta presioek eraginda, militantea despolitizatu eta banakako joera hobetsiko duelakoan. Kartzelak ongarritzen ari ziren. Lurra prestatu, abiatuko zuten azken ofentsiban EPPK desagertarazteko. Kontzientzia politikoaren edozein arrasto betiko desager zedin.

## **Kartzela frontearen xake taulan,** *jake*

ETA erakundeak José Antonio Ortega Lara kartzelaria arrestatu zuen, 1996ko urtarrilaren 19an Logroñoko espetxeko inguruetan, eta ekintza honek irakitan jarri zuen dispertsio politikak sorturiko egoeraren zartagainak.

Izan ere, urte bereko lehen urratsen balantzea egitean, Euskal Herriko udaletxeetan sakabanaketaren kontra Senideak elkarteak aurkeztu zuen mozioa oso atxikimendu zabala jasotzen zuen bitartean ezer gutxi mugitzen zen, arlo politiko eta instituzionalean, bidegabekeriari amaiera emateko. Ehun udaletxe inguruk kartzela politika aldatu eta dispertsioaren bukaera exijitu zuten arren, entzungor jarraitzen zuen PSOEk.

Egia esateko, nahikoa lan zuen Bellochek, justizia eta barne ministroa, beren etxe barrukoa konpontzen, jakina baita itsasontzia hondoratu baino apur lehenago arratoi guztiek lurreratzeko premia izaten dutela, eta Ferrazeko sotoetan halaxe ziharduten askok. Halabeharrezko aldaketa haien ondorioz, David Beltrán Catalák, EAEko Epaitegi Goreneko Fiskal ohia eta Belloch-en laguna, hartu zuen Espetxe Instituzioetako Zuzendaritza Orokorra. Progre etiketarekin iritsi zen Mercedes Jabardoren bulegoa hartuz.



***Juan Alberto Belloch, Pedro Pablo Mansilla zesantea eta Alberto Barciela.***

Krisialdi berean, ordura arte Espetxe Administraritza bere gain izan zuen Pedro Pablo Mansilla etxera bidali zuen Belloch-ek. Bere tokia Martin Alberto Barciela Rodriguez-ek hartu zuen. Barne Ministerioko burokrata ilun honek PPk izendatuko zuen hurrengoari dena txukun uzteko agindua zuen.

Gauzak horrela, Ortega kartzelariaren arrestatzeak espetxe fronteko ur geldoa alimaleko indarrarekin astindu zuen. Batzuek, hipokresiaren gailurretik, ekintza armatua baino lehenago dispertsioaren requiem-a jotzear zegoela jendartea sinistarazten saiatu bazuten ere, ez ekimen ez izapide sortzen ez zuten instituzioen aldetik urduritasuna antzeman genuen. Kartzeletan ere, ohiko mehatxuen

artean, funtzionarioen bisai kezkatuak eta deklarazio urduriak eragindako lurrikararen efektua ziren. Beltran-en eskutik hainbat kontaktu saiatu ziren EPPKren mintzakideekin, baina kutsu poliziala zuten, Kolektiboaren bizi baldintzak eta estatusa mintzagai ez, eta Ortega aska zezaten ETArekin zeharkako hartu-emanen bila egindakoak. ETAk, bere aldetik, oso garbi hitz egin zuen. Euskal erakunde armatuak zioen posiblea zela administrazioa eta EPPK harremanetan jartzea, are gehiago berriki Europako Legebiltzarrek sakabanaketa politika gaitzesteko egina zuen deklarazioari erreparatuta:

> *Euskal gizartean babes nabaria duten euskal preso politikoen kolektiboak plazaratu dituen aldarrikapenei erantzun beharko die gobernu espainiarrak. Bere esku daudenen militanteak bahitu politiko gisa erabiltzeari utziz, beren eskubide guztiak, gizaki gisa dagozkienak, eta politikoak ere errespetatuz, senide eta lagunek jasaten duten zigorrari amaiera emanez...*
> *Jakina izanik gatazkaren nuina politikoari heltzen ez zaion bitartean ondorioak gogorrak izango direla, gatazkaren ondorio batzuk arindu ere egin daitezke borondaterik izanez gero. Maniobra politiko zatikatzaile eta txantaiatzeko jo izan dute usu agintari espainarrek euskal preso politikoengana. Mintza daitez oraingoan presoekin ondorio batzuk gainditu ahal izateko.*
> *Hartara, agiri honen bidez Euskadi Ta Askatasunak eskeintza zehatza egin nahi du. Gobernu espainiarrak Instituciones Penitenciarias delakoaren bidez eta gartzeleroak buru dituztelarik bideratzen duen estrategia errepresiboa bertan behera utziz gero ETAk neurri bereko keinua egingo luke, gartzela funtzionarioak ez liratekeelarik gehiago bere ekintzen helburu izango.*

ETAk eta EPPKk menderatzen zuten partida, eta xake taularen erdi-erdian gure piezak zeuden nabarmen, euskal jendartearen begietara eta baita kartzelarien kolektiboaren izkutu-gogoa aintzakotzat hartuz, amore ematerik gabeko irtenbidea proposatzen zelako. Nazioarteko legediaren babesa bilduko lukeen konponbidea gobernua eta EPPKren arteko elkarrizketen zioan kokatuta zegoen. Kartzeletan, egun haietan argitara eman ziren Juan Mari Olano euskal preso politiko ohia eta AAMren bozeramaleak egindako adierazpenen sintonian zeuden animoak eta aburuak:

> *Bahituta dauden eta legez kalean egon beharko luketeen presoen askatasunaren giltza gobernuak dauka. Ortegaren askatasuna, berriz, kartzeleroen jarrera aldaketarekin loturik dago.*

Izaten dira, batzuetan, zeruan elkarri erantsita bidaiatzen duten lainoak. Modu berean, gertakizun haiek guztiz lotuta zeuden urtarrilaren 15az geroztik EPPKk bi estatuetan abiatu zuen borrokaldi mugagabearekin. Eta, gauza jakina da, behin pottokek mendi-atakak gainditzen ikasita, itxita uztea lan samurra izango da, baina ez da eragingarria izaten.

Martxoaren 24a arte txandakako gose grebak burutu zituen Kolektiboak. Bi asteko barau-tarte hauekin, Euskal Herrian berbatzea, hauxe da, sakabanaketaren amaiera, exijitzen zuten kartzelatik. Zeuden kartzela edota estatutan zeudela, bost txandatan egin zuten gose greba.

Martxoaren 25an tokian tokiko txapeoak egiten hasi ziren euskal preso politikoak, borrokaldiaren fase berri baten protesta molde gisa aukeratuta. Ekimenari sostengarritasuna ematea oso



***Herrerako kideak. Beste toki askotan bezala, aberriratzearen aldeko borroka etengabean 1996ko urtarrilaz geroztik.***

garrantzitsua zen, baina, horren parekoa etsaia despistatzeko taktika. Izan ere, Herensugea gose handiko munstroari bezala, berau hiltzeko arraultza txiki-txiki bat hartu eta kopetan bost aldiz jo behar zaio espetxe sistemari benetan kalterik egin nahi badiozu. Bestela jai. Aspaldiko leiendak gurean, ikaskizun handiak bi estatuen kartzeletan, arkakusoaren ziztada ematen ikasia baitago EPPKren kidegoa. Halako enfasia jartzen zuen etsaiak bere nagusitasunean, non ahaztu bide zitzaion borrokarako berezko militantzia euskal preso politikoena zela. Politikari profesionalek eta kartzeleroek, ordea, ez zuten borroka irudimenik. Horretan ere, burokratak dira, gutxi batzuk salbu.

## **Espainiaren zimurretan,** *Aznar*

Martxoaren 3an Jose María Aznar espainiar ultraeskuindarrak irabazi zituen hauteskunde legislatiboak, Gonzalezi hirurehun mila bozkako aldea atereaz. PNVk, ohi legez, euren apeta asetzeko moduko kontratu egokiaren bila jardun zuen, temati, eta PSOEk egin zituen azken etxeko lanak Herri Batasunaren kontrako hertsapen judiziala finkatzeko neurriak ondare gisara uztea. PPk eta Garzonek gogo biziz jaso zuten ondare hura, jakina denez.

Kartzeleei dagokienez, Aznarren lehen adierazpenetan kausitu genuen bere egitasmoen norabidea: "Espetxe politika berberari eusteko asmoa daukat". Lehrngo lepotik burua. Ortega Lara funtzionarioak, bere aldetik, eskutitz bat bidali zuen bere gordelekutik, non, bere egoeraz jabe zitezen eta "Euskadi nazio librea izateko eskubidea duela" esateaz gain, bere lankideei "presoei jipoiak eta tratu ankerra emateari uzteko" eskatzen zien. Egun haietan masiboki Donostiako Artzai Oneko katedralean aurrera eramaten ari zen txandakako itxialdi erraldoiak salatzera zetorrena berresten zuen Ortegak.




**Badajozen zeuden euskal preso politikoak eta GRAPOko bi kide ikus daitezke argazki honetan**

EPPKk lerro batzuk zuzendu zizkien bi estatuei maiatzaren 1ean argitara eman zuen agiri publiko batean:

> *Beti bezala, euskal herritarrek Euskal Herriaren eskubideei erakutsi dieten atxikimendu sendoa eta etsaiak dituen ezintasunak daude. Agintari espainiar eta frantsesei beraiek zanpatzen duten Euskal Herria bizirik dagoela ikustetik datorkie amorru hori (...) Ez dira konturatzen milaka kilometroetara egonik ere Euskal Herria dugula bihotz-burutan, eta gure aurkako zigor horrek Euskal Herriaren bihotzean txertatzen gaituela gero eta gehiago (...) Ohoinak uste du, beste guztiak direla ohoin. Horrela, Euskal Herriaren geroa bahiturik eta trukerako txanpon gisa erabiltzera ohiturik direnek, bestek ere horrela egitea nahiko lukete. Ez dago txantaia izpirik ere egoera injustu eta krudel bat gainditzeko nahiaren atzean, baina bai dago zigorraren mehatxupean pertsona bere borondatearen aurka aritzera behartzen denean.*

Ekainaren 16an, bestalde, euskal preso politikoen Kolektiboak Euskal Herrian berbatu arte hasitako borroka mugagabearen hirugarren fasea martxan jarri zuen. Sei hilabete luzetan txandakako gose greba eta txapeoak egin eta gero, hilabeteko txapeo iraunkorrari eman zioten hasiera, bi zatitan banatuta.

Ekimenaren berri ematearekin batera, bi mezu garbi helarazi zituzten. Lehena, kartzelariei, espetxeetako egoerak bere horretan zirauen-eta, azken erasoak lekuko:




**Jaime Mayor Oreja eta Angel Yuste. PPren espetxe politikaren ezina irudikatzen duten bi aurpegi ezagun.**

> *Gurekiko gorrotoa eta jokaera kriminala ohikoa duten gartzeleroek Jaen-II, Valdemoro, Alcalá Meco eta Martutenen gutariko zortzi jipoitu dituzte azken bost hilabete hauetan. Gartzeleroek egin dezaketen gauzarik onena, Instituciones Penitenciarias presionatzea da inolako zalantzarik gabe, zeren eskubide bat ukatzen diguten bakoitzean, kate berri batez lotzen baitute gartzeleroek beraien lankidea.*

Bigarren mezuaren jasolea PNV zen. Hain zuzen ere, Kolektiboaren izaera politikoa eta bere eskumeneko aferei heltzeko deliberamendua azpimarratzeko pasarte gardena irakurgai utzi zuten:

> *Mahai politiko baten inguruan bildu eta oinarrizko diren eskubideak nori errespetatu eta nori ukatu erabaki dezaketeela uste badute, tamainako erantzunak sortzen ari direla ere jakin behar dute (...) Euskal preso politikoen Kolektiboari dagozkion eskubideak kudeatzea soilik guri dagokigun zerbait da eta ez beste inori, are gutxiago Ajuria Eneako mahaia edo Sabin Etxeari. Guztiz komenigarria da honetan inor ez erratzea.*

Eskubideen inguruko eztabaida piztuta zegoen Ortega kartzelariaren arrestatzearen markoan, eta legalitatea gora legalitatea behera, zer den bahiketa eta zer den legeriaren kontra inor kartzelan mantentzea, eztabaida oparoak gauzatu ziren nonahi. Bahitu edo atxiki? Kideen artean ere zeresan handia eman zuen gaiak, ondoko hausnarketa anonimoan ikus daitekeenez:

> *Ortega Lararen arrestoak eta presoek bizi dugun egoerak zerikusi zuzena dute. Euskal Herriak preso politikorik ez balu, Ortega Lara ez litzateke dagoen lekuan eta egoeran egongo. Nahiz eta ETAk zeresan handia duen, presoak Euskal Herriratu eta presoei zor zaizkien giza eskubideak errespetatuz gero, Ortega Lararen egoeraren konponbidea etor daiteke. Bitartean; inork ez dela enbutuaren legea inposatu, ez bere gogoetan ezta bere jardunean ere, eskubideekiko begiruneak langa guztiak -guztiak diot- altxako bailituzke bapatean. Lazo urdinzaleen arazoa nagusia begibakar modura jokatzea da, kartzeleroarentzat eskubide direnak ez omen dira betebeharrekoak gurekin.*
> *Hau kuxidadea!*

Paradoxez eta, batez ere, zurikeriaz beteriko eztabaida haietan datu ukaezina agertu zen: 1996ko abuztuan baziren 125 euskal preso politiko beren zigorraren hiru laurdenak beteak izanda, kalean egon beharko luketeenak. Praktika judizial ohikoaren kontra zihoan eta erabaki politiko baten ondorio zen trataera zela medio, baldintzapeko askatasuna ez zitzaien aplikatzen EPPKko kideei. Oinarrizko eskubideen defentsan hitz eta pitz askok bai, baina euskal preso poli-

tikoek eta ezker abertzaleak bakarrik bultzatu zuten praxi koherente bat. Salbuespenezko egoera hartan borroka zen giltza, eta eskubideen ate-orpoak kirrinka ari ziren hartan, sarraila zuloa non zegoen agerikoa zen.




Goizean patioko putzu isiletan elkartzen dira usoak
Izenik gabeko egun grisetan
Eta kale bustietako putzuetan irudikatzen ditut
Zure oinetako beltzak bustirik
Iragan galduetako aldirietan arrotz

Baina gaur izenik gabe agertu dira hezurrezko zuhaitz bustiak
Izenik gabe isurtzen dira estratetako erosta-zotinak
Eta begi tristeak dituzte usoek
Izenik gabe dira zure ferekak ene gorputzean
Eta ezabatuz doaz
Izenik gabe datoz oroitzapenak nonbaitetik
Gabon gaua da arkatzik gabe gelditu den presoarentzat
Gabon gaua gutunik gabeko postontzietan
Eta kartoizko kaxa bustiak dirudite etxe bustiek euripean

*Mikel Ibarguren*

Mikel Ibarguren zestoarrak Fresnesen idatzitako olerki min hauetan sahiestezinak dira abagunearen zertzeladak. Izan ere, irailetik aurrera beste gose greba berri bat egin zuen EPPKk. Euskal Herrian berbatzea, beren eskubideen defentsan, eta estatus politikoa erreibindikatuz, mugagabeki ekin zioten gose grebari.

Ordezkari talde batek eman zion hasiera protestaldiari, geroztik, taldeka, preso gehiago batu zirelarik. Txandaka parte hartuz, Kolektibo osoak utzi zuen bistan espetxe politikaren alferrikako tema, eta, bestetik, euskal preso politikoen determinazioa. Gose grebak 1997ko apirilaren bukaera arte iraun zuen, Donostiako Artzai Oneko katedralean presoen aldeko borrokak jendarte mailan zuen babesaren oihartzuna biderkatzen. Ahazteko zailak dira 1996. urtetik aurrera burutu ziren mobilizazio erraldoiak. Bai eta herriz herri eta auzoz auzo ere sortu ziren plataformen dinamikak. Labur beharrez, Jokin Urain Kixkur mendarotarrak duela gutxi ARGIAn utzitako hitzetan laburbiltzen diren ideiak daude:

> *Jendearen ahalegina eta borroka, senide eta lagunen elkartasuna, jazarpen guztien gainetik askatasun bila jarraitzen duen eta bizi nahia erakusten duen herriarenganako konfiantza, bihar jarraitzekotan uzten duzun egitekoa... Beti daude heldulekuak, itxaropena eta bizipoza ematen dizuten argitxoak, estropezuaren eta erorikoaren ondoren enegarren aldiz jarraitzera zaramatzaten indarguneak.*

## **Uda hartako** *eguzkitzapena*

1997ko uztailaren 1eko egunsentiak bi albistek gainezkatu zituzten teletipoak: Cosme Delclaux enpresaria aske utzi zuen ETAk, eta Jose Antonio Ortega Lara kartzeleroa Guardia Zibilak askatu zuen. Jadanik ia bi urte ETAren esku zegoen Ortega, Arrasateko lonja batean topatu zuten. Gisa guztitako erreakzioak antzeman ziren. Dena dela, zetorren ekaitzaren lehen trumoiak baino ez ziren bi albisteok artega handia eragin zuten.


egin
Ortega vuelve a la cárcel
Kritika gogorra EHUren euskara politikari

EL MUNDO
ETA le enterró en vida y le trató como a un perro
Floren Aoiz, de HB, amenaza: «Tras la borrachera policial, viene la resaca»
Así fue la 'Operación Bol': 6 llamadas de Mayor Oreja a Aznar en la madrugada

***Nork bere ikuspegitik, Ortegaren askatzea garretan jaso zen, bai Euskal Herrian, bai Espainian.***

Ortega arrestaturik egon bitartean instituzio eta instantzia askoren ahotik entzun ziren adierazpen zuhurrek inmobilismoari eman zioten bide berehala, eta laster batean ikusi genuen kartzeleroa aske zela, presoen eskubideak zapalduak izaten jarraituko zutela. Hura egiaztatzeko Aznarren hitzak: "Gobernuak tinko eta ausardia osoz jarraituko du terrorismoaren aurkako politikarekin". Amildegirako pasaia poltsikoan zeraman.

Kartzelako lapikoan, bestalde, egoerak borborrean jarraitzen zuen. Datu batzuk ematea nahikoa da horretaz jabetzeko.




1997ko otsailaren 7an Jose Maria Aranzamendi Arburu *Katxue*, Alcalá Meco espetxe espainolean hilik agertu zen, aireztapen hodietara lotutako lepoko zapi batekin urkatu balitz bezala. Baina Katxuek ahoa zinta batekin estalia zuen eta eskuak eta oinak kiroletako oinetako batzuen lokarriekin loturik zituen. Hil eta gero, egundoko arrangura eragin ziguten EGIN egunkarian argitara eman ziren bere gogoeten hainbat pasartek:

> “*Nik ondo asko dakit zer sentitzen den alboko kidea jipoitu dutela entzuterakoan. Kartzeleron probokazioak jasan behar izatea zer den ere ondotxo dakidan bezala. Ezina eta amorru bilakatzen den sentipen hori ezagutzen dut. Baita dakit nolatan sentitzen garen exterminatutako kide bat gorpu ikusterakoan, ikurriñak estalita, zortzi metro karratu betetzen dituen bakardade horren erdian negar eginez (...) Ongarririk onena dugu guk: Euskal Herria horrenbeste maitatzea, non, bere defentsan, bizitza bera ere emateko prest gauden.*

Elorrioko borrokalari nekagaitzak izkutuko bizimodua zeraman Frantzian, harik eta 1987an entregatu zuten arte. Aske utzi eta gerora, 1991. urtean atxilotu zuen Guardia Zibilak. Oso bortizki torturatu zuten. 1995an, berriro ere atxilotua, ondorioz espetxeratu zuten. Bertan, bi hilabete jarraian eduki zuten erabat isolatuta, eta senetik aterata itzuli zen modulo arruntara. Inoiz ez zen betikoa izatera itzuli, tragedia gauzatu zen arte. Exterminio estrategiak beste marka bat grabatu zuen zenbakailuan.

Martxoaren 14an, Antxoni Fernandez, Angel Figueroa presoaren amona hil egin zen Getxotik Alcala Meco kartzelara bere biloba bisitatzera zihoala, Aranda de Duero herrian jasan zuen istripuaren ondorioz. Ostera eta ostera gertatzen ziren istripuen artean beste bat zen. Aurreko larrienean, Matilde Arribillagak galdu zuen bizitza, 1994ko otsailaren 18an. Xabier Jauregi Andoaingo euskal presoaren ama, Senideak elkarteak Gasteizen egin behar zuen ekitaldi bate-




***Matilde Arribillaga eta Antxoni Fernandez.***

ra joateko autobusa hartzera zihoala kamioi batek harrapatu zuen bere sorterrian, Andoainen.

Osasun arazoek ere burrunba atera zuten, ekainaren 6an konorterik gabe aurkitu baitzuten Mitxel Sarasketa, presorik beteranoenetako bat, Almeriako bere ziega barruan. Gaitza burmuinean zuen, odolbildu batek eragindakoa, eta hospitalera eraman behar izan zuten. Egun batzuk lehenago, gertakari larri bat jazo zen espetxe berean, Koro Egibar euskal preso politikoa patioan zebilela, zaintza garitatik lehergailu txiki bat bota eta alboan eztandarazi baitzioten. Indar txikikoa izan arren, zetorren aldaizearen aurrekaria zirudien.

Izan ere, uztailaren 10an Miguel Angel Blanco atxiki zuen ETAk. Madrilgo gobernuari berrogeita zortzi orduko epea eman zion euskal preso politikoak Euskal Herriko espetxeetara eramateko. Horren ezean, PPko zinegotzia hil egingo zuen. Sakabanaketa politika betiko birrintzeko ardura soinera hartu zuen ETAk, eta gobernuaren itxikeriari erantzunez, gobernuko politika berretsi eta "xantaiaren aurrean amore ez emateko" erabakia lau haizetara zabaldu ostean, erakunde armatuak exekutatu zuen Ermuko hautetsia.

Ondorengo orduetan, aldez aurretik prestaturiko biolentzia uholde batek berotu zuen Ezker Abertzale osoaren arnasa. Mediatikoki diseinatu zuten eskemak funtzionatu zuen, eta jendarteak urak eta suak hartuta, faxisten ordua iritsi zen, hala Euskal Herriko kaleetan, nola espainiar estatuko kartzeletan. Presoen hilketa estrategiari harresi sendo bat jartzeko burututako ekintza armatu hark EPPKren kontrako hamaikagarren ofentsiba garatzeko aitzakia gisara erabili zen, hurrengo egunetan jipoiak, jazarpena eta lintxamendu saiakera han hemenka nozitu zituzten euskal preso politikoek.

Erasoek, tokian-tokian jatorri ezberdinak izan zituzten, kartzelero, polizia edo preso sozialek egin baitzuten euskal preso eta beraien senideen kontra.  Caceres 2an, Alcalá Mecon eta beste tokitan

jipoitu zituzten euskal presoak. Bidenabar, ia kartzela guztietan egon ziren saiakerak, irainak, probokazioetan edota senideen kontrako mehatxuak edo jazarpenak. Ez ziren, beraz, txikitik ari. Politikari profesionalek gezurrezko lantua zabaltzen zuten bitartean, erronka jo zuten: gu akabatzea.

Erantzuna erronkaren maila berean egon zen, izan ere, lehen olatuak mantsotu ahala, kontraerasoan jardun zuten euskal preso politikoek: kartzeleroen jokamoldea salatu, inposaturiko isolamendua (gu babesteko ezarritakoa!) bertan behera utz zedin borrokaldiak, hainbat erasotzaileri muturra berotu eta, orobat, hari batetik zintzilikatu nahi gintuztenak arrastoan sartzea. Gorriak ikustarazi gintuzten beste behin ere, eta doluzko uzta ekarri zuen gorrotoaren ereiteak.

Juan Carlos Hernando *Peli*-k, Arakaldon jaioa eta Arrigorriagako bizilaguna, uztailaren 20an eman zuen azken hatsa Albaceteko presondegian. Kartzelaldi gogorra izan zuen, batez ere, familiarengandik hain urrun egotea jasangaitza egiten zitzaiolako. Halere, inoiz ez zuen damutze seinalerik egin. "Lagunak ezin ditut traizionatu ezta nire burua ere" azpimarratzen zuen.




Ermuko izpirituaren adarrak kartzeletaraino iritsi zirenean, bereak eta bost esan eta entzun behar izan zituen Albaceteko espetxean, preso sozialen artean oso gisa ezberdineko erreakzioak gertatu baitziren Blancoren heriotzaren kariaz. Ataka hartan jarrita, lepotik zintzilikatzea izan zen ondorioa, zergatiak eta erabaki horren azken arrazoia jakin gaberik ere, espetxe politikaren eta muturreko tentsioaren fruitu mingarria izan zelarik. Aintzanek eta Oroitzek, neska laguna eta semea, bere familia osoak, Arrigorriagako udal aretoan hartu zuten bere gorpua, eta dispertsioaren kontra korporazioak erakutsi zuen jarrerak Ajuria Eneako itunaren sinatzaileen esparrua inarrosi zuen. Ahoa neurri eraiki zuten eszenatoki birtualak pitzadurak zeuzkan, eta Ermuako mamua hustu zen. Errealitateak eraman zuen herrestean.

## **Kolektiboaren soslaia,** *inoiz baino politikoagoa*

ETAk, Miguel Angel Blancoren kontrako ekintza politikoki kokatzeko plazaratu zuen agirian euskal preso politikoen Kolektiboaren begirunerako pista batzuk antzeman zitezkeen:

> *(...) PPko zinegotziaren kontrako ekintza ETAren presio kanpainaren baitakoa da. Kanpaina horren bidez, presioa egin nahi zaio gobernuari, dagozkion erantzukizunak bere gain hartuz, euskal preso politikoen kolektiboak izendatu zituen hizketakideekin elkarrizketa bideei ekin diezaien.*

Beste era batera esanda, PPko gobernuak EPPKrekin mintzatuz aldatu beharko lukeela espetxe politika, zapaltze elementuen ordez, Kolektiboren izaerarekiko zein bizi baldintzen duintasunarekiko begirune osoa adieraziz. Interlokutore politiko garbia zen EPPK. Sahiestezina.

Publikoki errefusatzen bazitzaion ere, EPPkren mintzakideek harreman politiko garrantzitsuak lotu zituzten, alderdi zein instituzioekin, agerikoak zein erreserbatuak. Adibidez, Gasteizko legebiltzarreko Giza Eskubideen batzordeko lau kidek bost orduko lan-bilera izan zuten Alcalá Mecon Juna Lorenzo Lasa Txikierdi euskal preso politikoarekin. 1997ko martxoaren 4an egindako elkarrizketa hartan espetxe politikaren muinean zeuden aferak hizketagai egon ziren bost orduz jarraian: presoen hurbilketaren aldeko legebiltzarraren akordioa, Kolektiboaren erreibindikazio taula, Ortega Lara,... EAEko parlamentariei ahoan bilorik gabe jakinarazi zitzaien zeintzuk ziren Kolektiboaren irizpideak; halaber, zeintzuk ziren mintzakideekin tratatu beharrekoak, eta zeintzuk, ordea, ETAren teilatuan zeudenak. Baina interlokuzioaren maila guztiz politikoa izan zen, eta sona handikoa.

Ez zen lehen aldia izan, ezta azkena izango ere, izendatuta zeuden kideengana hala-nolako mezu, mezulari, ordezkari ofizial edota berripurdiak hurbiltzen zirela. Hauexek ziren, garai hartan, EPPKren mintzakidetza osatzen zuten euskal preso politikoak: Juan Lorenzo Lasa Mitxelena, Mertxe Galdos Arsuaga, Jesus Mari Zabarte Arregi, Gloria Rekarte Gutierrez, Jon Enbeita Ortuondo, Jon Gaztelumendi Uribarren, Unai Parot, Alberto Lopez de Lacalle, Idoia Martinez Garcia, Iñaki Bilbao Beaskoetxea, Gabi Mouesca, Frederik Aramburu, Daniel Dergi, Jose Mari Dorronsoro.

Kolektiboaren eta, bidenabar, mintzakidetzaren helburuak zeintzuk ziren jakiteko, Jon Gaztelumendik EGIN egunkarian aletzen zituen argudioak berrirakurtzea lagungarri zaigulakoan gaude:

> *Kolektiboaren helburu nagusia ez existitzearena da. Baina gaurko egoeran hau pentsaezina denez gero, helburu politikoak, helburu penitenziarioak eta bizibaldintzazkoak ditugu. Kolektiboaren antolaketa bizi den koiuntura politikoaren menpe dago, segun zein den bata, horrela izaten da bestea.*

*Mintzakidetzak gaurko koiuntura politiko errepresiboari erantzuten dio eta Kolektiboa ordezkatzen du. Koiuntura hau gainditxuz gero, Kolektiboaren helburu politiko orokorra hurbilago egongo da. Eta bihar berbatuz gero, agian beste batzuk izango dira Kolektiboaren helburuak ordezkatu behar dituztenak.*

Ohi den legez, Kolektiboaren kidegoak aukeratu egiten zituen bere ordezkariak, baina ordezkapen hori aldi baterako zen, ardurak konpartitu eta zabaltzea osasungarria dela betidanik zabal-zabal aitortu baitu gure Kolektiboak.

Esan bezala, Beltran kartzelero nagusia, Egibar eta Urbiola jelkideak, PNV-EA-IU ko parlamentariak pasatu ziren mintzakideen lehiatilatik. Kasu gehiago egon ziren. Esate baterako, Willy Meyer, Izquierda Unidako nazioarteko politika arduradun izandakoak Puerto de Santa Marian bilera bat izan zuen Jon Gaztelumendi mintzakidearekin.




***Willy Meyer, Joseba Egibar eta Antonio Rubalkaba.***

Baina ez ziren espainiar politikari profesionala soilik, nazioarteko antolakundeek ere berbiziko interesa zuten Kolektiboaren egoera neurtzeko. Hala, Gurutze Gorriko Nazioarteko Batzordeak eskaera ofiziala bideratu zion espainiar gobernuari 1997ko urrian. Lekuko eta mugarik gabe egon nahi zuten euskal preso politikoekin. 1986an azken aldiz egin zuten bezala, ospe handiko batzorde horrek kontrastatu nahi zituen *in situ* euskal preso politikoek eta instantzia ofizialek espetxeratuen inguruan helarazten zieten informazioen arteko aldea.

Cornelio Sommarugak, batzordearen presidentea, kudeatu zituen kontaktuak gobernuarekin, urgazpen neutrala bermatzeko behar beste garantia emate aldera, baina PPren erantzuna ezezkoa izan zen. Erantzuna zazpi hilabetez atzeratu bazuten ere, borreroek ez zuten lekukorik nahi. PSOEk 1987an moztu zuen haria etena mantentzea berretsi zuen Aznarrek.



***Cornelio Sommaruga, Gurutze Gorriko Nazioarteko batzordeburua.***

Nazioarteko politikari eta arlo humanitarioan dihardute beste antolakunde asko ere, sakabanaketaren amaieraren alde agertu ziren, hala nola, Tortura Prebenitzeko Taldea (APT), Espetxeen Nazioarteko Behatokia ((OIP), Tortura Prebenitzeko Europako Batzordea (CPT). Soka luzea, izan ere, Gasteizko legebiltzarrak presoen eskubideak errespeta zitezen eta guztiak beren bizilekuetatik hurbil zeuden espetxeetara eramateko espainiar gobernuari luzatutako eskabideak ez baitzuen erantzun positiborik jaso. Aitzitik, Mayor Orejak ministroak aintzat hartuko ez zuela ihardetsi zion, harro eta gor. Halere, mugaz gaindiko antolakundeek Gasteizko poltroizale gehienek baino indar handiagoa jarri zuten dispertsioa buka zedin ahalegintzen. Txor-txor jardun etengabea da euskal politikari gehienen grazia bakarra.

## **Gudu ondorengo** *bilana*

Xantaia egiteko tresna den espetxe politikak zigortu ditu euskal preso politikoak eta beren senideak. Euskal Nazio Askapenerako Mugimendua ahuldu ez, eta, bere ezinean, EPPK kolpatu dute behin eta berriro bi gobernuek. Ikusi berri dugun legez, gainera, gupidarik gabe eta oso gogor kolpatu ere 96-97 urteetan, Ezker Abertzale osoa suntsitzeko plangintzaren hasierako biurtekoa, alegia.

Ortegaren arrastatzea edota Blancoren kontrako ekintzaren haritik entzundako hainbat hausnarketaren arabera, gatazka liskar bortitzezko parametroetatik ateratzea eta demokrazia osoa erdiestea lehentasunak dira, eta hori lortu bitartean, presoak egon egongo dira. Dena dela, horrek ez du esan nahi ehunka preso politikoen eta beren senitartekoen duintasun politiko zein

pertsonala bigarren mailako helburuak direnik. Hori dela eta, haiek guztiak lehenbailehen Euskal Herriratzea erdiespen garrantzitsutzat jo zuen Kolektiboak.

Dispertsioak hamar urte indarrean eman ostean, legearen beraren zaurtzapena eta ankerkeria barra-barra zabaltzea ziren fruitu bakarrak. Bidean, ordea, hamabi euskal preso politikok eta sei ahaidek galdu zuten bizitza aipatu epealdian.




Eta presoen erronkak berehala aurkitu zuen oihartzun zabala euskal jendartean. Donostiako Artzai Ona katedralean gose greba mugagabea eta etengabea abiatu zenetik, mota guztitako ia sei mila mobilizazio egin ziren 1997ko amaiera arte. Horrekin batera, ehunka sabotaiak salatu zuten espetxe politika kriminala. Hau guztia gutxi balitz, munta handiko beste nazio ekimen batzuk burutu ziren, zeinen artean aipatzekoak diren 1996an Gasteizen zein Bilbon deitutako manifestazio erraldoiak, Europako zazpi hiritan bostehun euskaldunek egin zuten baraua edota Iruñeko seminarioan zortzi lagunek egin zuten itzeleko gose greba. Elkartasunaren irrintzia Euskal Herriko bailara guztiak zeharkatu zituen.

Elkar loturik, Kolektiboak ere taula erreibindikatiboaren aldeko borroka andana piztu zuen, aurreko orriotan zehaztu duguna, hain zuzen ere. Baldintza eta koiuntura kaskarrenetan ere, Herria eta EPPKren arteko zilbor-hestea hausterik ez zegoela egiaztatu zen. Horri esker lurperatu zen Ermuan altxarazitako mendebal-haizea, horri esker hizketakideen profil politikoak eta zereginek inoiz ez bezalako zentralidadea lortu zuten, eta, finean, elkartasunaren kriseilua sekulako bidaia egin zuen. Balantze ikaragarria.

# Zazpigarren epealdia

## 1998-2001




*Aznarrek ni baino preso terrorista gehiago hurbildu nahi izan zituen. Nire agintaldiko unerik gogorrena izan zen. Niretzat onartezina zen presoak hurbiltzea, hura nazionalismoari arnasa ematea zen*

Jaime Mayor Oreja,
PPko barne Ministroa

## **Estatuak** *tai gabe*

Kartzelak leporaino betetzea. Hura zen amankomunean Frantziak eta Espainiak adostutako bidatz-orria. Ausardia kontua ere bazen, antza, inoiz urratu ez ziren errepresio bideak korritzeari ekin zitzaion-eta Bidasoaren bi aldeetan. Zain eta muin jardun zuen Aznar eta Chirac bikoteak arrainari ura kendu nahian. 1997ko otsailean HBko mahai nazionala espetxeratu zuen Garzonek Alternatiba Demokratikoa sozializatzeagatik, eta 1998ko udaran EGIN itxi zuen. Bi oldarraldi hauen atzean, Moncloako maizterraren ausardia omen zegoen: "Norbaitek uste al zuen ez ginatekeela ausartuko?", pontifikatu zuen Aznar presidenteak.



**Fleury Frantzian, Soto del Real Espainian, disidentzia politikorako gotorlekuak.**

Ez zen nahikoa, eta den-dena ETA dela frogatu behar zela, euskal gazteria ere izugarri astindu zuten, horretarako Atutxa eta PNVren ezinbesteko laguntza izan zutelarik. Ondorioz, ETAren *beso politikoa* izategatik, ETAren kale indarkeria burutzeko *Y taldeetako* kide izateagatik edo dena delako akusazio xelebrea medio, terrorismo delitu-tipoa mugagabe zabaldu zen, eta hamarka pertsona espetxeratu zituzten. 1998ko lehen goizalban 559 kidek osatzen zuten Koletiboa.

Frantzia eta Espainia, beraz, ore bateko opilak. Izan ere, Frantziako gobernuak legeria gogortu, sakabanaketa politika beren doktrina antiterrorista txertatu eta kartzeletako bizi baldintzak okerragotu baitzituen oso denbora motzean. Beheak eta goiak tragatu behar zituztela zirudien, eta ezkerreko abertzaleak *menu*-aren zizka-mizkak ginela.

## **Zer da** *mitard-a?*

Leihorik gabeko ziega bat, soilik sabaia aldean argizulo bat duena. Porlanezko mahaia eta ohea dauzka, lurrari irmoki atxikituak. Mitard-aren barruan karramarroa dago, jakina, eta argi artifiziala eguneko hogeita lau orduz dago piztuta. Matoia-k ez beste inork ezin baitu piztu edo itzali, beraz, euskal preso politikook ez dugu iluntasunaren pribilejiorik lo egiteko. Beti bistan egotea



da geure nortasunaren ondorioa, baina baita bertoko kartzeleroen ganoraren apeta, haiek izaten baitira presondegian dauden higuingarrienak. Kaka egiteko makurtu beharra dago, kokoriko jarri, lurrean zulo bat besterik ez dago-eta.

Eta gainera, mitard-ean egon bitartean, ez duzu bisita eskubiderik, ezta kideekin egotekoa ere. Sarebegiz estaltzen dute patioa. Patio nimiñoa. Dutxatu gaitezke bi aldiz asteko, iturri bat duen horma-hilobi moduko batean. Hau ere burdin hesiz estalpeturik. Janaria hotza, plastifikatua. Hogei minutu inguru dauzkagu dena jateko; geroztik, janari-azpila erretiratzen dute, amaituta egonda ala ez. Hau da bertan egoteko zure tresneria: jantzita daramazun arropa, tapakia eta izarak, jaboi pusketa, hiru liburu, papera, axota eta seiluak. Liberté, egalité eta fraternité, hiru gezur horiek egia balite!

## **Erantzunak ere atsedenik ez:** *Kolektibo bakarra*

Ez soilik Frantzian, bazihoan Espainian ere errepresioa goraka. Horren nabarmen non, 1997ko azaroan, hogeita zazpi kartzeletako euskal preso politikoak borrokan zeuden. Aberriratzea, isolamendua amaitzea, bizi baldintzak bermatzea eta, oro har, gaixotasun larriren batek jota edota zigorraren hiru laurdena beteta zeukaten kideen askatasuna ziren eskabiderik ohikoenak. Baina

borrokan jardutea zen estatuari branka jartzeko aukeratu zen jarrera, beraz, otzanik ez zuen kidegoak estrategia hura onartuko. Jesus Mari Zabarte *Garratz*-ek oso adibide egokia aukeratu zuen hura adieratzeko EGIN egunkarian egin zioten elkarrizketa batean:

> *Espetxeak betidanik helburu bakarra izan du, presoak suntsitzea. Adibidez, baserritarrak mendian aske den behor edo zaldi bat harrapatzen duenean, zer egiten du? Emeki-emeki suntsitzen joan, ezta? Eta azkenean baserriko arto sailetan artajorran jartzen du. Honi hezkuntza deitzen diote. Geureari berriz "reinserción, reeducación". Bergizarteratu, non? Berezitu, non? Beren sistema español kapitalistan! Español baskongado nahi gaituzte! Urteak eta urteak daramatzate presoak suntsitzen, ea honekin herria suntsitzen duten. Ez dute lortu! Ez dute lortuko! Preso bakan batzuk suntsitzea lortu dute eta lortuko dute, baina ez dute lortuko Herria suntsitzea.*

Eskema xume honetan, taxu ofentsiboa hartu zuen Kolektiboaren ekinbideak, eta berriz ere lehen lerroan ipini zuen bere eskubide politikoen erreibindikazioa. Ez zen eskabide berria, historikoa baizik, baina koiuntura berrira egokitua. Mintzakidetzatik holaxe laburbiltzen zen:

> *Funtsean eskatzen duguna zera da, dagozkigun eskubideak aplikatzea. Eta aplikatzen diguten politika penitentziarioa guztiz desegokia eta maltzurra denez, eskatzen duguna da marko berri bat non preso politikoei gure berezitasuna onartuko litzaigukeen. Kolektiboak paper politikoa jokatu behar du. Euskal Herriko eraikuntza nazionalaren prozesuan presook gure papera izan behar dugu, honen ondorio zuzena baikara.*

Izan ere, nazio eraikuntza oinarri zuen baina ibilbide demokratikoa eskrupulosoki bermatzen zuen Lizarra-Garaziko Akordioaren zimentarriak finkatzen ari ziren. 1997. urtearen bukaeran Herri Batasuneko Mahai Nazionalak EAJ, EA, Ezker Batua, sindikatuetako eta jendarte zein herri taldeetako ordezkariekin bilatutako hitzarmena iristear zen.




Kolektiboaren kontrako gerra estrategiaren galeren inbentarioak ez zuen amaierarik, eta urriak 27an Santi Diez kide ohia hil zen. Hogeita hamalau urterekin minbiziaren ondorioz hil egin zen. Asistentzia ezagatik areagotutako masailezurpeko minbizia larriagotu ondoren ospitaleratu zuten. Zazpi hilabete lehenago kaleratua izan zen gaixotasuna atzeraezina zelako eta ezinezkoa zelako ebakuntza kirurgikorik egitea. Kartzelatik atera zutenerako beranduegi zen, baina inortxok ere ez zituen kontuak eman.

Biolentoak eta odolzaleak gu ginen-eta.

Garai berean, Ajuria-Eneako ituna hilzorian zegoela, ETAk espetxe frontean ekintzen etenaldia aldarrikatu zuen. 1997ko azaroaren 19an zabalduriko agiri baten bitartez, iragarri zuen "bertan behera utzi" zituela espetxeetako frontean egitekotan zituen ekintza guztiak, eta dei egin zion euskal jendarteari eta euskal erakunde eta alderdiei "sakabanaketaren aurkako ahaleginak" sendo zitzaten.

Ekintza armatuen etenaldi honek ez zuen islarik izan Kolektiboaren egoeran. Aitzitik, 1998ko martxoan gogor txarretsi zuen Senideak elkarteak orduz geroztik euskal preso politikoek pairatzen zuten presioa: jipoiak, desasistentzia medikua, isolamendu egoerak,… Ez zen inondik inora ikusten halako egoera batean gobernukideen aldeetik egon zitekeen adimen politikoa. Begoña Sagarzazu mintzakide izandakoak egongaitz bizitzen jarraitzeko arrazoiei buruz itauntzen zuen:

> “Une honetan elementu berri batekin aurkitzen gara: espetxe frontean azaroaz geroztik mantentzen den su-etena. Honek erantzukizun handia eskatzen du eta EPPKk ardura osoz heldu dio erronkari dituen tresnak baliatuz: espetxeetan gauzatzen ari den burruka, eta Mintzakidetza gatazkan zerikusia duen gizarte-eragile guztiei zabalik dago eta arazoa bideratzeko prest.

PNVk eta bere akolitoek ere, gauzak alda ez zitezen eskura zuten guztia jartzen zuten etengabe: Inaxi Zeberio hil zuen Ertzaintzak Gernikan, Ynestrillasi alfonbra gorria jarri zioten Orereta n,… Ez zuten eskrupulo handirik izan dispertsio politikaren babes lana utzi eta espetxeratuen giza eskubideen defentsazko diskurtso farfailtsu baina praxi gabekora pasatzeko.

Giro politiko berria, 1998an ETAk emandako su-etena eta, batik bat, aurreko urteetan metatu ziren indarrek eta borondateek bide eman zioten eszenatoki berri bati, non gutxi batzuk bakarrik sentitzen ziren deseroso. Horien artean, José Antonio Ardanzak hartu zuen berbiziko pisua, eta Ibaetako plataformatik sakabanaketaren aurka manifestazio bat deitu zuten herritarrak eta eragileak "zinikoak" deitu zituen lotsagabeki. Hala eta guztiz ere, hamarka mila pertsonak lepo bete zituzten Bilboko kaleak apirilaren 5ean. Hartaz gero, erretiroa hartu zuen lehendakari ohiak, politikoki onenak emanda.

Bitartean, euskal preso politikoen aldeko dinamika zabalak sortu ziren nonahi, eta *Batera* plataforma dinamika horren motoretako bat izan zen. Horren lekuko, 1999ko urtarrilean presoen alde Bilbon burutu zen manifestazio erraldoia. Preso politikoen aldeko dinamika herrikoia eta zabala bazen ere, PNV, EA eta IUk aldarrikapen horrekiko konpromisoak alboratu egingo zituzten, presoen eskubideen aldeko konpromisoa baldintzapean eskainiz, eta ezker abertzalearen aurka txantajerako tresna gisa erabiliz.

Aznarren gobernuak ez zuen fitxarik mugitu nahi izan, eta zerbait egin zuenean maniobra huts bat burutu zuen, euskal jendartearen demandatik lekutan geratzen zen sasimugimendua, alegia.




Izan ere, 1999ko irailaren hastapenetan 27 euskal preso politiko lekualdatu zituzten Euskal Herriko presondegietara, eta beste 76 kartzelaz mugitu zituzten, batzuk etxera hurbiltzeko, bestetzuk, ordea, are urrunago giltzapetzeko. 1998ko abenduaren 18an, bestalde, espainiar penintsulatik kanpo sakabanatuta zeuden 21 kide barreiatu zituzten Andaluzia eta Levanteko kartzeletan, analista eta eragile guztiek laidogarritzat jo zuten azpijoko batean. Trukerako txanpon gisa erabili nahi zuten Kolektiboa, eta horren aurrean berriro hartu zuen mintzatzeko txanda EPPKk:

*“Espainiako Gobernuak, Gerrarako Ministro duen Mayor Orejaren bidez, euskal preso politikookin burutu duen azken maniobraren aurrean honokoak jakinarazi nahi dizkiogu euskal gizarteari:*

**1.-** *Gure indar guztiz salatzen dugu Espainiako Gobernuak preso politikook bere jostailu gisa erabiltzea. Sakabanaketa politika derrotatu duen Kolektiboa, orain txantajea, "constitucionalisten" barne-kohesio, salerosketa eta merkadeo politikorako erabili nahia porrot eginen duen beste azpikeria bat besterik ez da.*

**2.-** *Hala ere, preso politikook panpin gisa Espainiako kartzeletan gora eta behera ibiltzearekin egin duen jokaldia Kolektiboak euskal gizartearen gehiengoaren babesarekin eskuratu duen garaipena dela: jasandako presioaren aurrean Espainiako Gobernuak "mugitzen" den itxura ematera behartu dugu.*

**3.-** *Euskal Preso Politikoen Kolektiboaren eskakizunak honokoak direla:*

*· Gure senide eta lagunei jarritako zigorra arintzeko, sakabanaketarekin amaitu eta Euskal Herriko kartzeletara eraman gaitzatela.*

*· Gure militantzia politikoak eskatzen duen heineko tratua eman diezagutela, preso politikoen estatusa aplikatuz.*

*· Kartzelak edota bestelako arrazoiek eraginda gaixorik dauden burkideak kaleratuak izan daitezela.*

*· Ezarri ziguten kondenaren hiru laurdenak beteta dituzten burkideak kaleratuak izan daitezela.*

*· Euskal Herriko askapen prozesuan herritar eta militante politiko gisa parte hartzeko eskubidea dugulako eta horren alde borrokatu eta borrokatzen garelako preso politiko guztiak askatzea.*

**4.-** *Euskal Preso Politikoen Kolektiboa osatzen dugunok Frantzia eta Espainiaren gerra-bahitutzat hartzen dugula geure burua.*

**5.-** *Euskal preso politikoon eskubideen alde egunero-egunero lanean diharduten euskal*

*herritar orori gure eskerrik sentikorrenak luzatu nahi dizkiegu; eta, bide batez, dei egiten diegu euskal gizarteari oro har, eta bereziki alderdi politiko, sindikatu eta bestelako eragile sozialei euskal preso politikoen eskubideak defen-datzeko ekimenak biderkatu ditzaten.*

**6.-** *Oroitarazi nahi dugu Euskal Preso Politikoen Kolektiboko partaideok, 1996ko otsailaz geroztik gure eskubideen aldeko etenik gabeko borrokan murgilduta jarraitzen dugula, unean uneko protesta eta borroka moldeak erabiliz.*

**7.-** *Gogorazi nahi diogu Espainiako Gobernuari Euskal Preso Politikoen Kolektiboak bere mintzakidetza aspaldi izendatua duela presoen inguruko gaiak konpontzeko. Edozein elkarrizketarako mintzakide guztiak espetxe berean biltzea dela gure lehen eskakizuna. Bide batez, salatu gura ditugu gure mintzakideek alderdi politiko, sindikatu eta bestelako instituzioekin harremanak eduki ditzaten Yuste eta Mayor Orejak ipintzen dituzten oztopo eta debekuak.*

*1999ko irailaren 8an*

Egun batzuk geroxeago Esteban Esteban Nieto euskal preso politiko izandakoa Tolosan, bere jaioterrian, hil zen.




Kromak hamabi urte zeramatzan kartzelan, eta bereak eta bi pasarazi zizkion etsaiak denbora horretan. Azkenean, osasuna guztiz kaltetua, isolamenduaren, jipoien, bizi baldintza makurren eta desasistentziaren ordaina minbizi diagnostiko bezala agertu zen. Ez tratamendu, ez konponbiderik ez zuen gaixotasun heriogarria. Kromaren irmotasuna eta bere askatasunaren aldeko mobilizazioei esker, etxera itzultzea lortu zen, nahiz eta Eduardo Fungairiño Auzitegi Nazionaleko fiskalak eskura zuen guztia jarri zuen askatzea oztopatzeko. Honakoa idatzi zion Esteban Nietoren askatasunaz deliberatu zuen epaimahaiari:

> *“Mediku forenseak egindako txostenaren arabera, fiskalak ez du ikusten bateraezintasunik zigortuaren gaixotasuna eta espetxean egotearen artean. Aipatu zigortuaren esperantza bizitzaren berri besterik ez da ematen. Horrexegatik, eta fiskaltza honek jakin badakienez zigortuak beste bi epaiketa egin gabe dituela, lehergailuz eragindako erahilketa anitzei buruzko epaiketak alegia, fiskal honek uste du ez dela preso honek duen preso errematatuaren egoera aldatu behar.*

Presoak hil, eta ahal bada, presoak *errematatzea,* hori ez besterik bilatzen zuen estatuak espetxe politikarekin. Hori baino ez zuen nahi Euskal Herriarentzat. Abagune politikoa, hortaz, txarrantxa batez estu lotuta zegoen, gerra diseinua bere muinean. Kromak berak egoera politikoaz hitz

egin zuen GARAn, kaleratu berria egin zioten elkarrizketa batean:

> *Madrilekin lotzen gaituzten amarrak moztu behar ditugu, kalean borrokatzen, barruan, toki guztietan, presioaren bidez. Adierazi behar diegu atera ditzaketen etekinak garesti aterako zaizkiela. Etekina ordainketa baino txikiagoa izango denean, orduan bukatuko da, horretarako borroka eta borroka da bidea: kaletik, udaletxetik, foru aldunditik, Lakuatik. Madrilekin harremanak eten behar ditugu eta esan behar diegu: bahituta gaituzue, zuek ikusi, baina zuekin ez dugu ezer jakin nahi eta kontuz gurekin. Gero egin dezatela nahi dutena, uste dut berehala askatuko gintuzketela, emango zizkiotela kartzeletako konpetentzia Eusko Jaurlaritzari eta presoak ekarriko zituztela. Hori da nire ikuspuntua, borrokaren bidez besterik ez dut ikusten. Hitz egiten hemen ez da sekula ezer lortuko eta borroka da geure irtenbide bakarra, askatasuna ez baita ematen, lortu egiten da.*

Zirimola haren testuinguruan, EPPKren barne trinkotasuna nabarmen gauzatu zen. Bada hau berresteko datu ugari, baina esanguratsuenetako bat dugu IKko eta ETAko presoak komunan ez ezik, Kolektibo berean ere egotea, EPPKren kide izatea, zalantzarik gabe.

Luzaz zetozen ezin ikusiak eta harremanen etetea. 1989an, adibidez, hilabete bateko gose greba burutu zuten IKko presoek, Amnistia exijituz, eta ETAko presoek muzin egin zioten borrokaldiari. Berdin borroka dinamika ETAko presoen aldetik zetozenean, batzuk borrokan eta besteak ezinikusiarena eginez. Egoera tamalgarria gainditzeko faktore aunitzek eragin zuten, jakina denez: nazio ikuspegi bakar batetik aritzeko ezker abertzale osoak egindako ahalegina, antolakundeen bategite saiakera, koiuntura bera,... Joxe Domingo Aizpurua usurbildarrak berezko hausnarketa eskaini digu:

> *EPPKren baitan eman zen antolakunde ezberdinetako kideen arteko batzeak zerikusi zuzena izan zuen Kolektiboak abiatu zuen barne mailako egituratze eta garapen propioarekin. Izan ere, bi elementu dira aintzakotzat hartzeko modukoak: lehena, ETA eta IKren arteko harremanen aldaketa, ezberdintasun politikoak zirela medio tajutu zen aldea samurtze aldera bururutikoa; bigarrena, frantziar estatuan Kolektiboak eratu zuen antolatze eta eragite ildoaren sendotasuna. Bi-biak eman ziren 90ko hamarkadaren azken urteetan, eta ordukoa da, zinez, Kolektiboaren erabateko batasuna eta jardute bateratua. Nazio estrategiaren fruitu oparo aizan zen.*

## **Otsoa** *belarritik oratu*

Gobernu eta ETAren arteko elkarrizketen markoan, hiru preso politiko izendatu zituen erakunde armatuak hizketakide: Antton Lopez Ruiz *Kubati*, Josu Urrutikoetxea eta Josetxo Arizkuren. Eta prozesua zapuztu artean elkarrizketa mahaiara eraman ez bazituzten arren, inork ez zuen kolokan jarri proposamenaren egokitasuna. Isilik dagoenak bai esaten du.





***Josu Urrutikoetxea, Josetxo Arizkuren eta Antton Lopez Kubati.***

1999an Euskal Preso Politikoek molde gogorrenarekin ekin zioten berriz beren eskubideen aldeko borrokari, Gose Greba Mugagabea. 2000. urteko apirilean amaituko den borrokaldia latza suertatu zen, burkide batzuengan ondorio fisiko larriak eraginez epe motz eta luzera. Borrokaldi honen bidez Estatus Politikoaren aitortza exijitu zen, gaixo dauden burkideen kaleratzea, presoen aberriratzea, eta euskal erabaki guneetan parte hartzeko eskubidea. Zehazkiago, hauxe da 1999ko urrian jakitera eman zen EPPKren agiriaren pasarte mamitsuena:

“ *Erabaki latz hau hartzera eraman gaituzten arrazoiak ugari dira, euskal herritarrok Frantziako eta Espainiako ziega ilunotan daramatzagun egun luzeak bezain ugariak. Oroitarazi nahi dugu Euskal Preso Politikoen Kolektiboko partaideok, 1996ko otsailaz geroztik, gure eskubideen aldeko etenik gabeko borrokan murgilduta jarraitzen dugula, unean uneko protesta eta borroka moldeak erabiliz. Molde ugari eta desberdinak saiatu ditugu: guztiak presoari kalte zuzena ekartzen diotenak, santzioa ez denean gorputzari eragindako kaltea.*

*Arrazoiak ugariak izanik, azken muturreko borroka mota honi ekiten diogu beste biderik ez dugulako gure eskubideak behingoz eta betiko errespetatuak izan daitezen.*
*Su-txikian akabatzen gaituzte kartzelotan. Ezintasunez ikusten dugu nola hil edota zauritzen diren gure lagun eta senitartekoak gu ikustera datozenean. Ezintasun eta amorruz ikusten ditugu gaixoaldi larrian asistentziarik gabe, Esteban Esteban Nieto bezala, hiltzeko baino askatzen ez dituzten burkideak. Borrokaldi honi hasiera ematera goazenean, gu guztion omenaldi sakon eta sentituena eskaini nahi diogu Estebani, irakatsi digun guztiagatik eta gudari baten duintasunaz borrokatu duelako bere bizitza osoan.*

*Euskal Herri aske batean, eta are mundu aske batean ere, bizi nahi dugulako eta horren alde borrokatu dugulako espetxeratu gintuzten. Heriotza zigorrik gabeko 'demokrazia' franko-espainiarrean ezkutuko heriotzaren kondena gure buruen gainean dago. Gure kulpa: Euskal Herriak jasaten duen injustizia eta zanpaketaren aurrean burua ez makurtzea eta gure arerioei aurre egitea. Espainia eta Frantziako kartzelak euskal herritarrez betetzen dira etengabe. Eta Euskal Herriaren eskubideak errespetatzen ez direno, ez da etenik izango. Ez gara ez lehenak, baina zinez nahi genu-*



*ke azkenak izatea!*

*Lehenik, Euskal Herriko kartzeletatik atera gintuzten. Gero urrundu. Azkenik sakabanatu. Gu zigortzearekin aski ez zutenez, gure senitarteko eta lagunak ere kondenatu dituzte. Mila aitzakia eta gezur erabili izan dute justifikaezina justifikatzeko: gogor eta bigun, borroka armatuaren 'menpekotasunetik' aldendu... Politika kriminal hori aurrera eramateko Euskal Herrian bertan konplizidade aitorrezinak izan dituzte Espainiako eta Frantziako agintariek. Eta konplizidadea ez zenean onespenezko isiltasuna.*

*Garai horiek amaitu dira. Sakabanaketaren politika kriminala derrotatu dugu. Damutasun, erreinsertzio eta txantaje guztiei aurre egin diegu, eta garaile gara. Baina Frantzia eta Espainiako handikiei ez zaie aski nonbait. Zer gehiago behar dute?*

*Euskal Herriak bere hitza emana du: euskal presoon eskubideak, gizabidezkoak zein politikoak, errespeta diezazkigutela. Guztioi. Eta lehen konplize edota isil zirenen babesa ere gustuz hartzen dugu. Egunero-egunero euskal preso politikoon alde lanean eta borrokan ari diren euskal herritarrak eskertu nahi ditugu, beraien ahalegin etengabea baita gure erresistentziarako arnasa. Espetxeko borroka erresistentzia baita. Minutu oro duintasuna mantentzearen aldeko borroka erresistentea.*

*Gure helburua Euskal Herri libre batean libre bizitzea da. Esan dugun bezala, horren alde borrokatzeagatik espetxeratu gaituzte. Eta horren alde borrokatzen segitzen dugu ziega hauetatik ere. Aldaketa nabarmenak ezagutu ditu Euskal Herriak azken urteotan. Euskal Herriak bere buruaren jabe izateko aukera eskura ikusten dugu, Euskal Herri askearen oinarriak ezarriko dituen prozesua martxan dago. Euskal gizarteak egiten duen indarraren arabera egongo da helmuga hurbilago edo urrunago.*

*Hain zuzen ere, euskal herritar eta militante politiko gisan nazio eraikuntza prozesuan parte hartzeko eskubidea dugulako eta horren alde borrokatu eta borrokatzen dugulako, preso guztiak askatzea da gure aldarrikapen nagusia eta lehenengoa. Gure indarra gainerako euskal herritar guztienari erantsi nahi diogulako. Gure jarduera historikoak aski legitimitate damaigu ahalegin horretan parte hartzeko.*
*Hauxe da euskal preso politikoon borroka zuzenduko duen ardatza: euskal presook Euskal Herrian aske egotea, beste euskal herritar guztiekin batera, euskal nazio eraikuntza prozesuan parte hartuz. Ez Espainiak, ez Frantziak ez dute euskal herritar ezeini aukera hori galarazteko eskubiderik.*

## **Betiraun goseak,** *min eta min*

Salbatore Mitxelenaren obra gerrak markatutako idazlanak dira, zinez. Euskal preso politikoek idatzitakoak eta, batik bat, bizi izandakoak ere gerraren arrastoa daramate atoian. Hala, 1999ko azaroaren lehenean EPPK-ko kideek mugagabeko gose grebari ekin zioten. Gose greba txandakatua izan zen: 302 presok hartu zuten parte, eta 7.694 egun iraun zuen guztira.

Borroka ekimen honek euskal preso politiko guztien kaleratzea galdatzen zuen. Izan ere, eraikuntza prozesuan parte ahal izateko askatze prozesu graduala erdiestea helburu zuen gose greba mugagabeari ekin baitzion Kolektiboak. Halaber, eta helburua lortu bitartean, guztiak Euskal Herrian batzeak, gaixotasun larriek jota zeudenen eta zigorraren hiru laurdena beteta zeukatenen berehalako kaleratzeak, eta iheslari politikoen kontrako jazarpenaren amaierak ardazten zuten presoen borroka.

Esan bezala, ehunka kidek parte hartu zuten muturreko protestaldi hartan, non gehienek hogeita bost eta hogeita hamabost egun bitartean luzatu zuten beren greba. Gosearen oihuak Euskal Herriko bailara guztiak zeharkatu zituen, eta presoak ospitaleratzen zituzten heinean jendartearen kezka eta mobilizazioa biderkatu zen progresio berean. Hainbat kasutan giza erresistentziaren muga guztiak hautsi egin ziren, eta kinka larrian egon ziren grebalariak.

Josetxo Arizkuren iruindarra lehen txandako grebalaria izan zen. Eta 56 egunez uko egin zion jateari. Azken egunetan zuen pisua 42 kilokoa baino ez zen, eta bere gorputz-tenperaturak ozta-ozta gainditzen zituen 35ºak. Deshidratazioaren mugan, Pariseko Hôtel-de-Dieuko medikuek sueroa ezartzea erabaki zuten krisi orokor batek hil egingo zuela antzeman zutenean.



***Mikel Egibar, Josetxo Arizkuren eta Daniel Dergi. Ehunka grebalarien artean, hiru adibide.***

Daniel Dergik 1999ko abenduaren 27an ekin zion gose grebari, 56 egun zeramatzan Josetxo Arizkurenen lekukoa hartuz. Frantziako Osny presondegian ekin zion, eta hasiera-hasieratik adierazi zien kartzela agintariei ez zuela mediku artatzerik onartuko Fresnes espetxeko erietxera eramaten bazuten. 40 egun greban zeramatzanean, Fresnesera bidali zuten eta, agindu bezala, artatzeari uko egin zion. Ziega arrunt batean sartu zuten. Egoeraren larriaz jabetuta, ziegatik ospitale zibilera eraman zuten. Azkenean, gorputzak urik onartzen ez ziola geratu zen, eta hil-zorian utzi zuen gose greba 63. egunean.

Preso lapurtarraren egitandiak jendartearen giharraren sasoia frogabidean jartzeko ere balio izan zuen, izan ere, heriotzaren mugaraino eramandako konpromezu froga hura abian zegoen prozesua laguntzeko, sendotzeko hasi baitzen. Borroka kolketiboa, herri-lan gisa ekin zitzaion euskal preso politikoen Kolektibotik. Dergik berak azpimarratu zuen bere esanahia gose greba amaitu eta gutxira:

> “*Kolektiboaren ekimena euskal jendarteari egin diogun maitasun adierazpen bat da. Gure borrokaren lehen harmailan euskal presoen aberriratzea kokatu bada ere, gure ikuspegitik garrantzitsuena nazio eraikitze prozesuan parte hartzeko erreibindikazioa da. Haratago, gainerako ajenteek ere modu berean parte har dezaten ahalegindu gara. Gure aldetik espero dugun gauza bakarra da maitasun adierazpen horrek gisa bereko erantzuna izatea. Elkarri erantzutea, alegia.*

## **Milurtekoaren** *abiapuntua*

Borrokaldi honek 2000. urteko maiatzara arte iraun zuen. Ordurako, 521 kidek osatzen zuten EPPK, eta gainditu gabeko gatazkaren isla zen gerra eremuan sahiestezinezko erreferentzia izaten jarraitzen zuten.

Hirugarren milurtekoa hasterakoan, gatazkaren beroan handituriko arazoetako bat konpontzeke zegoen: euskal preso politikoak Euskal Herriratzea. Urte hartako gabonetan ehunka ekimen antolatu ziren herriz herri, laupabost eguneko barauak, gisa orotako mobilizazioak, kontzentrazioak, espetxeetarako martxak eta abar. Hauen aurretik nazio ekimen garrantzitsuak antolatu ziren "Euskal Herria Kalera, presoen eskubideen defentsan" lelopean, oihartzun eta inplikazio zabalekoak. Senideak elkartea eta herri plataformak izan ziren dinamika haren sustatzaile nagusiak.

Erronkaren zioa pultsoa berreskuratzea zen. Komunikabideetan beharbada oihartzunik izango ez zuten baina herri dinamikari egundoko abiadura eta sakonera ematen zioten ekimenak ziren ardatzak. Izan ere, aurreko hilabeteetan hainbat alderdik zein sindikatuk bere gain hartu zituzten konpromisoei bizkarra eman zieten 2000. urtean. Herri borroka eta ekinbide armatua enegarren



aldiz bihurtu zen aitzakia perfektu, eta preso guztiei zegozkien eskubideen defentsa alboratu zuten. Okerrago, helburu horrekin sortutako *Batera* plataforma bai Kolektiboari bai ezker abertzaleari xantaia egiteko erabili nahi izan zuten, PNVk batez ere, presoen aldeko dinamika irteerarik gabeko kalezulo batetara eramanez. Hilabete gutxi lehenago izenpetu zuten dekalogoaren muinari ("edozein abagunetan edo inguruabarretan presoei dagozkien eskubide guztiak bermatu behar dira") atzea eman zioten lotsagabeki. Urteetan Amnistiaren aldeko Batzordeek egindako lan horizontala zapuztu nahian ahalegindu ziren arren, baziren hiru eskakizun euskal jendarteak aldarri modura biziki barneratuak zituenak: presoen aberriratzea, zigorraren hiru lardunea beteta zuenen askatzea eta gaixo zeuden presoen berehalako etxeratzea. Mugarri horiek tinko finkatuta zeuden eta, finean, Amnistiaren aldeko borrokaren kapital ukigarri eta begibistakoa ziren.

Bestaldetik, 2000. urteak euskal preso politikoen bizi baldintzen hondamena ekarri zuen. Historian zehar etengabe errepikatu duten bezala, espainar gobernukideek orduan ere garbi kokatu zuten espetxe politika "terrorismoaren aurkako borrokaren" arloan, eta jakin badakigu halako adierazpenak nola itzuli bai gaztelaniaz bai frantseseraz: eskubiderik ez, errepresioaren zakua mukuru bete.

Kolektiboaren osaketa aldatuz joan zen, apurka apurka. Ez filosofian, ez eta funtzionamolde aldetik, baina gero eta nabarmenagoak ziren presoen jatorria zela eta EPPKren ñabardura berriak. Euskal Herriari ezarri zioten salbuespen egoeraren eraginez, geroz eta gehiago izan dira euskal herritarren kartzelatzea eragin duten motiboak, Euskal Presoen Kolektiboa handituz, baita bere aniztasunean ere. Aspalditik, ez ziren soilik Euskadi Ta Askatasunako burkideak Kolektiboaren kide zirenak. Herri borrokan jardutegatik presoak, dinamika politiko zein sozialean ziharduten militanteak, IKko kideak,... Jatorri eta ezaugarri askotako militanteak zeuden kartzelan, eta EPPK guztien neurriko topalekua izateko asmoarekin zabaldu zen barne eztabaida euskal preso politikoen artean. Hilabete luze eta oparoak joan zitzaizkigun hasnarketa hura eginez, baina merezi zuelakoan gaude.

Hona hemen, adibide gisa, sabotaiak egitea egotzita urte batzuk kartzelan daramatzan euskal preso politiko baten gogoeta:

> “*Kolektiboaren baitan ez dut barne sailkapenarik antzeman, ez kategorizaziorik bederen. Hala ere, sailkapen moduko zerbait egiten den apurretan ere, maila ezberdinetan egiten da. Gauzak orokorrean hitz egiten direnetan, batzutan markatzen da sailkapen moduko bat: militarrak, politikoak, historikoak, kale borrokakoak, militante zaharrak, gaur egungo ETA,... baina gero, espetxe bakoitzeko giro hurbilean, beste motako sailkapen bat ematen da, nire ustez norberaren izaera eta nortasuna, norberak lantzen dituen harreman edota afinitateen araberakoa. Diskurtsotik praktikara antzematen da gure arteko berdintasuna, eta hori altxor deskribaezina da.*

Indultoa eta geroko lehen espetxeratzeak egin zirenetik hogeita bi urte igarota, une hartantxe handiak ziren ere adin mailako segmentoen arteko distantzia. Nolanahi ere, belaunaldien arteko uztardura etsaiak uste baino dezente errazago gauzatu zen Kolektiboaren baitan. Horretaz jabetzeko, hitza eman diezaiogun berriro aurreko gogoeta egiten zuen kide gazte berberari:

> “*Koskak egon badaude, azken finean, generazio ezberdinetakoak izateak, esperientzia eta bizipen mailan tartea egotea suposatzen baitu. Generazio nagusietako askotan lasaitasun beharra nabaritzen da, gazteagoen gogo eta zerbait gehiago egiteko premia edo sentimenduen aurrean. Nik izandako esperientzian, nahiz eta horrelako egoerak eman diren, inoiz ez du suposatu arazo bat, gehienetan kontrakoa. Adostasun batera iristeko beharra oso barneratuta ikusi dut beti kideen artean, beste ezeren gainetik eta koska horiek errespetuz eta malgutasunez landurik beti lortu izan ditugu adostasun puntu horiek.*

Kolektiboa anitza izanik, etengabeko errepresioak limatzen zituen pikorrak, eta gose greba eta bere ondorioez gain, orotarikoak izan ziren epealdi hartan kartzeletatik eman beharreko erantzunak. Esate baterako, osasun arrazoiak medio gose greban parte hartu ez zuten berrogeita hamalau kidek txapeoak egin zituzten.



Elkartasunaren soka ez zen sekula eten, ez eta tenkatze politikoarena ere, hainbat gertakariren kariz, ETAko militanteen heriotzak, entrega eta kanporatzeak, edota Gudari Eguna bezalako urtemuga gogoan, protestaldiak egon baitziren han-hemenka. Urritik aurrera ere isolamenduaren kontrako erantzun adar bat aktibatu zen, eta jardun hartan 142 kidek beren hartan zirauten.

Bi estatuetan jasandako jipoien erantzutera halabehartuta sentitu zen Kolektiboa, urtean zehar hamar bat kidek hezurretan sentitu baitzuten zaindarien mendeku gogoa. Aipatzekoak dira, epaitegieterako trasladoetan gendarmeek emandako astinduak, larriak ez ezik oso bortitzak ere izaten zirelako.

Lekualdaketak ere ugari, 125 kide presondegi berrietara eraman zituzten. Beste arrazoiak tartean, hirurogeita hamar kunda gehiago eman ziren jakitera. Euskal Herrian edo inguruko kartzeletan, ordea, ohiko kopuru txikia besterik ez zen geratu. Dena dela, egoera horrek ez zuen estatus mailako alderik sortu Kolektiboaren baitan. Sakabanaketarekin bilatzen baldin bazuten, nolabait, kideen arteko bekaizkeria edo mesfidantza eragitea, arroka jo zuten. Euskal Herriarekin muga duen espetxe batean dagoen kide batek hola ikusten du sakabanaketak, berez eta gure borondatearen aurka, sortzen duen ezberdintasunaren buruhaustea.

*“Euskal Herritik kanpo daudenei nola helarazi elkartasuna? Gure erantzun lerroetako bat izanik, hortxe dago laburbilduta. Haratago joanda, ez dakit, baina suposatzen dut beraien inguru hurbilari arreta berezia emanez, dispertsio politika haiei suposatzen dien zama guztiak ahalik eta gehien arinduz; eta ez dut materialki bakarrik esaten, baizik eta emozionalki. Egunerokotasunean hurbilagoko horiek sentitu ahal duten hutsune hori normaltzat ez hartzea suposatu dezakeen edozer, kontuan hartuz dispertsioa "bakarrik" ez, baita bizi baldintza gogorragoak izaten direla kide horientzat eta kezkak ere handiagoak hurbilekontzat.*



Isolamenduari dagokionez, besteengandik erabat bereizita zeuden 59 kasu zenbatu ziren milurte berriaren hastapenetan. Gogorrak eta zientifikoki kudeatuak, Puerto Ian zegoen Iñaki Rekarte irundarrak eskutitz batean salatu zuen bere isolamendu egoera. Ur tanta gazia ozeanoaren handian..., baina oso adierazgarria.




**2000. urtean Puerto Ian zeuden euskal preso politiko batzuk: goitik behera eta ezkerretik eskubira hasita, Jon Anza, Josu Ziganda, Jose Antonio Fernandez MAGILA, Fernando Arburua, Iñaki Rekarte, Joxean Agirre eta Juan Carlos Arruti PATERRA.**

*"Puertoko kartzela lau modulotan dago antolatua, baina badago beste modulo berezi bat, isolamendua azken muturreraino bideratzen duena. Guk, bunkerra deitzen diogu. Hamar ziega dituen galeria da, nahiz eta, aldi berean, nekez egoten diren bizpahiru preso baino gehiago. Kartzelarien ustez zerbait oso larria egiteagatik ekartzen gaituzte hona, edota lehen fasean sailkatutako presoak bi hilabateetarako, zeren legez kanpoko egoera eta bizimodua ezartzen baita bertan. Zonalde hau guztiz opakoa da eta erregimena ez legezkoa, presoak hona ekartzen baitituzte zehazgabeko zigor-denbora pasatzeko.*

*Hemen dauden kartzelariak kartzelako basatienak izaten dira. Beste moduloetan bortitz jarduteagatik nabarmendu direnek, bunkerrean aurkitzen dute babesa. Eta ez da marka makala, zeren Puerton estatu osoko odolgaiztokoenak destinatzen baitituzte. Nolanbait esateko, okerren artean okerrenak egoten dira hemen, presoen borondatea oinperatzeko aginduekin. Beharbada hori da gotorzulo honetan dugun arazo larriena, berez gogorra den erregimenari ñabardura hau erantsiz gero, pairaezina baita egoera.*

*Kartzelari bakoitzak bere keriak dauzka. Batzuek ate zartaka ematen dute eguna, ziegako edota galraiko atea ireki-itxi bakoitzean kolpe bortitzak emanez. Bestetzuen jokua argia itzali eta piztea*

*da, eta guztien zeregin gustukoena sartu eta nire puska urriak lurretik barreiatzea, miaketaren aitzakiaz. Irainak eta mehatxuak belarriak apaldu artekoak dira, eta deskuidatuz gero eraso fisiko bilakatuko dira.*
*Zulo honetan ez da inor egoten, beraz, inpunitaterako paradisua da. Ekarri nindutenean zazpi deabruak ikusi behar izan nituen, eta ez zuten erritmoa baretu harik eta egoera honek kalean erantzuten ari zela ikusi zuten arte. Orduan lasaitu ziren apurtxo bat. Dena dela, kartzeleroen presioa arintzearekin betra presio elementu berri bat sartu zuten, departamentu honetara beren konfidantzazko bi preso sozial ekarri zituzten-eta, egun osoa putakumeka eta "zure familia osoa akabatuko dugu" bezalako irain-hitzak oihukatuz ematen dutenak. Bi bortxatzaile direla badakit, eta hitzetik haratago sekula joango ez direla badakidan ere, ondorioak erotzeko modukoak dira. Holakoxea da modulo hau: presoekin funtzionarioek nahi adina egiteko hilobi aproposa.*

## **Atakatik** *onez atera gineneko paisaia*

Urteen joan-etorriak orbainak uzten ohi ditu kartzela barruko emozioen orubean. Maizenik, zalantzak eta intseguritateak. Ez hainbeste klabe politikoan, eta bai, ordea, perspektiba mailakoak: denbora, krisi pertsonalak, soilik arlo afektiboan uler daitezkeenak,... Goitik behera hauetan eragiten du, jakina, abagune politikoak, eta oso bereziki negoziazio ekinaldiek. Izan ere, ETA eta estatuen arteko dialektikaren zertzeladek ukitzen dute euskal preso politiko bakoitzaren itxaropen-emendioa. Batzutan maldan gora, bestetan aldapan behera, haize-koiunturaren zordunak ere bagara, eta Lizarra-Garaziko esperientziaren haustura (Arjelekoa edota aurrekoekin gertatu legez) ez zen oharkabean igaro geure barne ubideetatik. Horretaz galdetuta, Olatz Caminos bilbotarrak argibide batzuk eman dizkigu jakiteko zapuzturiko aukera hark (Lizarra Garazi) nolako arraildura utzi zuen kartzela barruan. Garrantzitsua baita jakitea euforia edota etsipenak ehundura berezia izaten al duten harresien bestaldean.

“*Presoak kartzelara sartzen duten une beretik, aurrera begiratzen du etengabe, eta inoiz ez atzera. Burua instintiboki ingurune berrira egokitzen saiatzen da, eta presoak berebiziko ahaleginak egiten ditu adaptazioa azkarra izan dadin, bere burua defendatzen ikasteko eta ingurune berrian bolada luzea pasako duela ulertzeko. Berehalakoan ulertzen du kaltegarri zaiola kanpora begiratzea eta kanpoaren esperoan bizitzea, ametsak mantentzen dituen arren, ez da bizi haien esperoan. Baina hau horrela izanik ere, ezin da ukatu egoera politikoaren ezaugarriek eragin handia dutela presoaren egoera animikoan. Ekidin ezina da ilusioz bizitzea eta alaitasunez, kalean negoziazio prozesu bat zabaldu bada eta giroa pil-pilean badago. Gure proiektuak garatzeko aukeraren ilusioa galduko bagenu, gureak egingo luke. Hortaz, aro errepresiboen gordinean, atxiloketak daudenean, eta nola ez negoziazio prozesu bat zapuztean, egoera animikoan ere eragina izaten du. Hala ere, presoak zerbait ezagutu baldin badu, eta batez ere urte luzeak preso daramatzatenek, egoera politikoaren gora-beherak eta zikloen joan-etorriak dira. Baditu mekanismoak gauzak ulertzeko eta burua kokatzeko, eta ororen gainetik, jarraitzen duen bidea egokia izatearen ziurtasunak ematen dio indarra.*

Ataka gogor eta zail hartatik aurrera begira atera ginela esatea ez da funtsa gabeko balentria. PNVk eta PSOEk babestu zuten PPren ofentsiba orokorra muturrez aurrera jausi zen, eta beste behin ere min izugarria egin ziguten arren, EPPKren lekukoak eskuz esku egin zuen basamortuaren zeharkaldia. Euskal Herria genuen itzal bakarra, eta okerrenetan ere harro bizi eta harro borrokatu genuen.

## **SAMINAREN** BALANTZE DOILORRA

1998ko ekainaren 22an Jose Mari Maruri Barakaldon hil zen auto istripuz, Basauriko kartzelara zihoan, preso zegoen Lander semea bisitatzera. Mari Karmen Salbide ugaotarra hil egin zen auto istripuz, 1999ko apirilaren 3an, Txetxu Fernandez laguna Logroñoko kartzelan bisitatu eta gero etxerako bueltan zetorrela. 2000ko otsailaren 2an Ruben Garate otxandiotarraren txanda izan zen, Alcala Meco kartzelatik bueltan hil zelarik Jose Antonio Hernandez Velasco presoari bisita egin eta gero etxera zetorrela. 2001eko irailaren 8an Iñaki Saez eta Asier Heriz soraluzetarrak hil ziren Lurdes Txurruka presoa, Brieva, Avilako kartzelara bisitatzera zihoazela. Hiru urtetan bost aldiz jo zuen hil-kanpaiak.



*Jose Mari Maruri, Ruben Garate, Asier Heriz eta Iñaki Saez.*

## **Txapela buruan** *ibili munduan*

Hogeibatgarren mende hasieran ezer gutxi aldatu zen estatuen espetxeetan. Nolanahi ere, Espainiakoak edo Frantziakoak ez ziren bakarrak izan. Gero eta espetxe gehiagotara zabaldu zen Kolektiboa. Gogoz kontra, jakina, baina aurreko mendeko azken txanpan nazioarteko

harremanetan PSOEk zein PPk harilkatutako hitzarmen berezien ondorioz, hamarka euskaldunek ezagutu zuten Europa eta Amerikako katzela sarea.

Mexiko, Alemania, AEB, Uruguay, Kanada, Britainia Handia, Portugal, Italia, Belgika, Herbeherak, Costa Rica, Argentina eta Suitza izan dira gatibuen destinu berri-zaharrak, eta kartzelaratuen bizi baldintzak kontinenteen araberako zertzeladak eduki zituzten: isolamendu gogorra pairatu zuten "zibilizazioen seaska" omen den Europa zaharreko gotorlekuetan, eta tokian tokiko espetxe sistema kaotikoaren daunbaden menpe bizi behar izan zuten Hegoamerikakoetan. AEBan eta Kanadan, bestalde, bertoko sekuritate-doktrinaren neurriko zorrozkeriak agintzen du.



***Euskal preso politikoak, Mexiko D.F.ko presondegian.***

Uruguayen eta Argentinan espetxeak ezagutu dituen Josu Lariz altzolarrak Atlantiko ozeanoa erdibitzen duen mugaz gaindiko espetxeratzeaz hitz egin zuen Berria egunkariarentzat:

> *Espetxe guztiak pertsonak ezabatzeko daude eginak, nahiz eta batzuen eta besteen artean alderik badagoen. Uruguay-ko Libertad kartzelan, esaterako, inoiz ikusi dudan txarrena da. Ez zegoen pertsonentzako egina. Argentinan tratua ezberdina izan da. Esan behar dut nire lurretik 15.000 kilometro baino gehiagora preso egon naizen denbora honetan guztian behin ere ez naizela bakarrik sentitu. Lagun handiak egin ditut kartzelaren barruan, eta Uruguaiko eta Argentinako herrien elkartasuna izan dut une oro nirekin. Behin ere ez naiz arrotz sentitu bi herrialde horietan.*

Izan ere, distantziaren kontrako txertoa elkartasuna dela frogatuta utzi dute euskal preso politikoek ziren lekutan zeudela. Dela Holloway edo Libertad espetxeetan, dela Munich edo Vughteko kar-

tzeleetako bakardadean, euskal preso politikoen soslaia eta Kolektiboarekiko lotura politiko-afektiboa ez dira sekula akitu. Arlo honetan ere guztitz kamutsa izan da "terrorismoaren aurkako" doktrina ofizialaren nazioarteko adarra.



***Josu Lariz, Hebe de Bonafinerekin batera.***

Aro zaila kartzeletan, baina indakeriazko ziklo horrek jipoiek utzitako orbainak besterik ez zituen utzi Kolektiboaren soinean. Jesus Mari Puy, Igor Solana, Iñaki Herran, Jorge Garzia eta beste kide askok larrutik ordaindu zuten estatuen plangintza kriminalari aurre egin izana, eta jipoiak, bortxaketak edota hiltzeko saiakerak jasan behar izan zituzten. Eskubideak direla ez direla, Iñaki Herrani egin zizkiotenak adibide gisa ekarri nahi izan ditugu orriotara:

“ *1999ko urriaren 1ean geundela, Parisko epaitegi batera eraman behar zuten euskal preso hau, eta kartzelan beti egin ohi dutenez, birritan miatu zuten. Lehendabiziko miaketa presondegiko zaindariek (Fleury Merogis) egin zioten. Bigarrena, aldiz, epaitegira eraman behar zuten jendarmeek egin zioten, eta miaketa honetan izan zen sexu erasoa. Herran biluzik zegoela, barrabilak altxatzeko galdegin zion jendarme batek. Euskal presoak ez zuen agindua onartu, eta poliziak haserretu ziren (...) Geroxeago, jendarmeen arduradunak lurrean etzateko agindu zion euskal presoari. Jarraian, bospasei jendarmeren artean hartu, lurrera bota, eta batek eskua ahoan ipini zion bitartean, besoak bizkarrean lotu zizkion beste batek. Denen artean eutsita, behatza sartu zioten ipurditik. Ondoren polizien furgoian sartu eta epaitegira eraman zuten.*

# Zortzigarren epealdia

## 1998-2001



*No es aceptable que un terrorista salga después de pasar un tiempo en prisión y pueda volver a pasearse por su pueblo*

Jose Maria Aznar,
Espainiako presidentea

## **Aldaketa** *garaiak*

Amnistiaren aldeko Mugimendua, alde batetik, eta EPPK bera ere, bestetik, sendotze eta argitze prozesuan murgildu ziren, eta 2001ko amaieran ikusgai geratu ziren norabide horretan egindako ahaleginak. Hasteko eta behin, preso eta iheslarien ahaideak biltzen zituzten Senideak eta Gureak antolakundeak batu ziren, Etxerat izeneko elkarte berria sortuz. Gasteizen aurkeztu zen Etxerat, 2001ko abenduaren 2an, eta Euskal Herriaren zatiketa politiko-administratiboa gainditzeko probetxua eta egokitasuna azpimarratzeko ideia nagusia zera izan zen: "elkar gaitezen, indar gaitezen". Elkartze hark indarra emango ziela jakitun, jendarteari argitasuna emateko bokazioarekin kriseilu bat aukeratu zuten ikur gisa.

Bi aste beranduxeago, Amnistiaren aldeko eta errepresioaren aurkako *Askatasuna* antolakunde nazionala abian jarri zuen Donostiako Kursaal aretoan bilduriko amnistiaren aldeko mugimenduaren nazio biltzarrak. Tresnen egokitzapena eta, bide batez, funtzionamoldeen hobetzea "panorama gorri berriari" aurre egiteko ezinbesteko urratsak zirela-eta, estatu espainiar eta frantziarraren jarduera errepresibo ororen ondorioak salatzeko eta herri mugimenduaren eragite esparruak zabaltzeko bideak irekitzeari ekin zion, lehen egunetik, *Askatasuna*-k.

Nahiz eta egun gutxi batzuk geroago Garzonek jadanik existitzen ez ziren Amnistiaren aldeko Gestorak legez kanpo utzi zituen, errepresaliatuekiko elkartasuna eta eskubideen defentsan jardungo zuen jende-harresi sendoa altxatu zen Donostian. Aurrerantzean nazio ikuspegi bakar batetik urte luzeetako euskal usadioari jarraipena emango zion antolakundeak lan eta xede berrituak jarri zizkion bere buruari.

Hausnarketa luze eta, batzutan, korapilatsu baten amaieran, Kolektiboak bere eztabaidaren ondorioak aurkeztu zituen 2003ko ekainean. Sakabanaketak eztabaidari pipiak egurrari bezainbeste kalte egiten zion arren, zailtasunak gainditu ziren, eta konklusioak lau haizetara zabaldu ziren. Besteak beste, Euskal Preso Politikoen Kolektiboak bere eragile papera aldarrikatu zuen. Zertaz ari ziren galdetuta, Olatz Caminosek azaldu digu lehen ondorio horren esanahia:

> EPPKan emandako eztabaidaren ondorioetako bat izan zen Kolektiboaren erreferentzialtasuna berreskuratu behar zela, eta gatazkaren konponketan zuen papera jokatzeko Kolektiboaren ahotsa indartzea beharrezkoa zela. Estatuek aurrera zeramaten ukazioaren estrategiaren ataletako bat Kolektiboaren beraren esistentzia ukatzean zetzan (eta datza oraindik ere), preso politikoen esistentzia bera ukatuz eta Kolektiboa kriminalizatuz. Ezker abertzalearen apartheid-aren beste faktore bat zen, noski, Kolektiboaren apartheid-a, berau gatazkaren ondorio gisa bakarrik aurkeztuz. Eztabaidaren ondorioz EPPK-ak bere burua subjektu politikotzat aurkeztu zuen.

Ildo horri helduz eta borroka bateratuei ekinez, urte bereko irailean Baldintzapeko Askatasuna eskuratu beharko luketen burkideen aldeko baraua eta bi asteetako txapeo orokor bati ekingo dio Kolektiboak, komunikazio greba burutuz.

Kolektiboaren antolaketa eta koordinazioan pausu berriak ematea erabaki zen. Pausu horiek Kolektiboaren izaera politikoa eta eragiletza artikulatzeko xedea zeukaten. Emeki gauzatu zen prozesu baten garapena jada ikusgai zen. Gainera, geure burua identifikatzeko logo bat aukeratu zen, espetxeetatik jasotako ekarpen guztien artean. Gauza txikietan ere, auzolana, elkarlana zen lan-filosofia.

Ondoko orrialdeetan ikus daitekeenez, ugari izan ziren jasotako ekarpenak, nahiz eta, azkenean, ezaguna egin den logoa aukeratu zen.

## **Kolektiboaren** *noranzkoa*

Eguneroko borroka dinamikaren zer-nolakoak ulertzeko klabe iraunkorrean jarri beharko genuke geure burua, alegia, protestaldi kanpainetan baino erresistentzia iraunkorreko dinamikan baitago murgilduta EPPK aspalditik. Desobedientzia jarraikorrak pisu handia hartu du euskal preso politikoen egunerokotasunean, espetxe sistema pitzatzeko eta gure izaera politikoa une oro agertzeko ezin aproposagoa da-eta. Nolanahi ere, ardatz gehiago dago egunean eguneango zereginetan. Joseba Garmendia urretxuarrak azaltzen zuenez:

> “*Hiru esparru ezberdinetan sailka ditzakegu. Alde batetik, eguneroko borroka txikiak funtzionarioekin. Gimnasioa edo eskola zabaldu dezaten. Telefono deien bost minutuko bitartea errespetatu dezaten. Ganadu edo ume bezala tratatu ez gaitzaten. Miaketetan biluztea eskatzen digutenean gure intimitate fisikoa errespetatua izateko bata ez gardena ekar diezaguten. Ziegako miaketan present egoteko eskubidea betearazten. Edozein arbitrarietateri aurre egiten. Bigarrenik, gure bizi-baldintzen okertzeari aurre egiteko borrokak daude. Hauek denboran luzatzen dira eta sakrifizio pertsonalak eskatzen dituzte: barauladiak, ziegan egun osoa igarotzea suposatzen duten txapeoak, desobedientzia ekimenak, etab. Alor honetan kokatzen dira isolamenduko zigor ziegetan zazpi hilabete eman zuten lagunak bertatik ateratzeko borroka, edota ziegetan bakarka egoteko eskubidea defendatzeko borroka. Azkenik, elkartasun ekimenak ditugu. Esaterako, senitartekoek eta lagunek gu bisitatzerakoan izan ohi dituzten istripuak eta heriotzak salatzeko; gaixotasun larriak dituzten presoei -Barandalla, Azkarate kasu- egindako bidegabekeriak salatzeko. Ekimen ia guztiek bere zigorra izan ohi dute. Txapeo egun bakoitzak ordaina du: asteburu bat zigor ziegetan; eta behin bost minutuko enkarteladarengatik bost eguneko isolatze zigorra ezartzera ere iritsi ziren. Esan beharra dago lehen epaitegian zigor hauek leuntzen zirela zigorrak erabat desproportzionatuak baitziren. Orain, aldiz, Auzitegi Nazionaleko epaitegi penitentziari berriarekin jai dugu. Epaile berria Galindori askatasuna ematen saiatu saiatuko da, baina guri ezta egunon ere.*

Gudu domestikoak, desobedientzia dinamika eta, azkenik, elkartasun ekimenak. Ondo uztartu beharreko ibilbideak, elkarren kontra jo ez eta jardunbide orekatua eta sostengarria ahalbidetzeko modukoa. Askotan ez da zaila izaten, etsaiak gure itomena bilatzen baitu bere ildotik. Dena dela, asko ikasi dugulakoan gaude, tokian tokiko borrokaldietan antzeman den zuhurtzia/irmotasun bektoreak erdi-erdian jo baitio xedeari.

Errepresioak, bestalde, nazioarte mailako jauzi erraldoia ezagutu zuen 2001ko irailaren 11an, New Yorkeko Word Center-eko eta Pentagonoko eraikinen kontrako ekintza armatuen haritik. Eratorritako giro antiterrorista zabaldu zen mundu osora, eta honek eragina izan zuen gurean, baita Kolektiboaren gorabeheretan ere.

Abagune ezin egokiagoa baliatu zuen PPk, PSOE eta PNVren erabateko laguntzarekin, euskal preso politiko eta, orobat, ezker abertzale osoaren kontrako neurri bereziak ezartzeko. Izan ere, legedia beren eromen faxistaren zerbitzura jarri zuten, mundu zabalean pil-pilean zegoen doktrina



**Brievan 2003. urtean egindako argazkia. Ezkerreko abertzaletasunaren mosaiko koloretsua: Euskal Herriaren alde borrokatzeagatik, denak gaizkile.**

antiterroristaren itzalean. Lehenagotik nazioarteko standarretatik urrun zeuden hainbat jardun errepresibo bazeuden ere (antolakundeen ilegalizazioa eta jazarpena, zigor eta espetxe politika maneatuta), beste buelta bat eman zioten torlojuari, EPPK, senideak eta baita amnistiaren aldeko mugimendua ere estu hartuz.

Besteak beste, ardatz berri hauen inguruan harilkatu zen euskal preso politikoen kontrako oldartzea:

· Mendekuan oinarrituta, eskubide guztiak hankapean hartzen zuen errepresioa.
· Errepresioaren esanetara moldaturiko legegintza-aldaketak. Indefentsioa.
· Berrogei urteko zigorraldiaren ezartzea.
· Espetxe barruko bizi baldintzen gogortze etengabea: komunikazioen murrizketak, EHUn ikasketak burtzeko debekua, espetxez kanpoko medikuen bazterketa eta abar.
· Baldintzapeko askatasuna eskuratzeko lege-ezintasuna
· Tokian tokiko zaintza epaitegien desagerketa. Horien ordez, Zaintza Epaitegi Zentrala sortu zen Auzitegi Nazionalean, euskal preso politikoen kontrol zuzena bere gain hartu zuena.
· Euskal Herritik urrunen zeuden presondegietara lekualdatze masiboak eman ziren.
· Isolamenduzko erregimenaren zabaltzea
· Jadanik libre zeuden preso ohien atxilo eta espetxeratze agindu berriak (Manu Azkarate, Enrike Letona)
· Borroketan parte hartzeagatik, grado gibelamenduak.

Hau guztia ez da ematen eszenatoki aseptiko batean, azken batean, euskal nazioa edota kutsu independentista zuen edozer hondatu nahi zuen errepresioak, Udalbiltza, Egunkaria, ikastolak, Elkar, AEK ere jopuntuan zeudelarik. Izua nonahi, gezurra ari zuen.

Une gogorrak eta, aldi berean, gogoangarriak, izan ere, Lizarra-Garazikoa bezalako aukera historiko baten zapuzketatik irten berriak, egon zitezkeen sentimendu kontrajarrien edota etsipenaren txingar-hautsaren gainean erortzen baitzen egoeraren ankertzea. Halere, errotak jarraitzen zuen gari-bihia xehakatzen.

"Ataramiñe", euskal errepresaliatu politikoen literatura koadernoak lehen aldiz agertu ziren 2002ko abenduan, Durangoko azokan. Bertan jasotzen ziren euskal preso zein iheslari politikoen idazlanak, eta arrakasta lortu zuten. Orduz geroztik, neguro egon dira eskura erakustazokan, eta presoen gogoetak, poesiak, narrazio labur zein luzeak, denek izan dute tartetxo bat gure literaturaren emarian.

Gezurra bazirudien ere, porlanezko hobietan itxitako pertsonek idazten zuten bere egoeraz, bai, baina baita aspaldi ikusten edo sentitzen ez zituzten egoera eta gauzei buruz ere.




*Sartu berri,*
*bakardadea aurkitu nuen espetxean*
*eta izutu egin ninduen.*
*Txiki erraldoia, oso berea eta*
*zuriz jantzita zegoen.*
*Zaratatsua ni,*
*hain isila bera,*
*aldatuz joan ginen biok.*
*Berak dizkit orain istorioak kontatzen*
*adi entzuten diodalarik nik.*
*Belauniko begiratzen nion lehen*
*lepotik helduta goaz orain.*
*Eta behin baino gehiagotan,*
*elkarrekin dantzatu dugu*
*gau ilargitsuetan.*

*Enrike Letona Biteri, 2002*

# **Fleury Merogiseko** *balada*

Apirilean izan zen, 2002ko udaberri hartan, Fleury Merogiseko kartzelan zeuden euskal preso politikoen senideek Baionan prentsaurrekoa eman zutela. Aurreko hilabetetik aurrera haien ahaideak zigor zeldetan zeudela iragartzeko egin zuten agerpena, baina beste zerbait gehiago ere esan zuten, oso garrantzitsua, indarraz ez ezik egundoko adimenez ere jarduten zutela erakusten baitzuen: zigor moduan bururatu zuten *mitard* bera, borroka tresna bihurtu zuten Pariseko kartzela destinu zuten euskal presoek.



**Fleury Merogis-eko zaintza dorretxoa. Kartzela honetako euskal preso politikoek lortu zuten mende berriko lehen garaipen handia.**

Beste toki askotan, zuzendaritzaren asmoen zer-nolakoek eramaten gintuzten erantzutera Fleuryn, Frantziako gobernuak errepresio eskemak eta moldeak Espainiatik ekarritako burni-bidean enkajatu zituenetik. Izan ere, berezko interesa izanik ere, frantziar espetxe administrazioak inportatu zituen Espainiatik sakabanaketa, isolamendua eta bortizkeria fisikoa. Hiruoineko horren gainean oinarritu zuten espetxe politika. Gotzon Kortazar gasteiztarrak lehen lerrotik bizi zuen Fleuryko liskar luzea; memoriaren zirrikituak astinduz, lehen hurbilketa hau egin digu egoera perspektibaz kokatzeko:

*“Urte luzetan, espetxe bakoitzeko edota egoera pertsonalen araberako dinamiketan ehuntzen ziren Frantziako borrokak. Paris inguruko kartzeletan batik bat, elkartasunak gidatzen gintuen, baina nahasmendua nagusitzen zen. Nolabait esateko, ez zegoen koordinazio edota borroka estrategia jakin bat garatzeko oinarririk. Fleury-ko borrokaldi entzutesua zela medio (2002-2003) dinamika ordenatu, elkartasunaren irizpideak parametro tasagarrietan neurtu eta, azken batean, tokian tokiko markoak aintzat hartuta ere, EPPKren interbentzio politikoaren hiru mailak elkarren artean orekatzeko orubea finkatu zen.*

Honek, jarraitzen du Kortazarrek, borroka parametro eraginkorrak finkatzeko balio izan zuen:

> “*Geroztiko dinamikak erreibindikazio taulak eta plangintzak konbinatu zituen, tokian tokiko baldintzak eta aukera errealak zeintzuk ziren ahaztu gabe. Itsumustuka aritu beharrean, indarrak neurtuta, helburuak erdietsi genituen kartzela gehienetan, inprobisazioarengatik bi asteetan indarge edota erre eginda bukatzeko arriskua alboratuz. Oso lan txukuna egin zen, eta gogoeta hark izugarri lagundu gintuen. Osny, La Santé edota Fleury-ko egoera objektiboa ezberdina zela jakinda, geure estatus eta bizi-baldintzak kartzela bakoitzeko hobekuntza eta berme-marjinaren arabera doitu genituen.*

Borrokaren zioak bi ziren. Lehena, D5 moduloan zeuden kideak bertatik ateratzea. Teorian, behin-behineko egonaldi laburrak egitekoa zen modulo hartan egonaldi luzeak egin behar zituzten euskal preso politikoek (ordurako Jose Luis Turrillasek eta Didier Agerrek hilabete asko zeramaten), nahiz eta bizi baldintzak tamalgarriak ziren. Horrekin batera, gainerako kideak -hogeita hiru guztira- bi moduotan elkartzea zen erreibindikazio nagusia. Bigarren zioa bisiten iraupena zen, ordubetekoak izatea lortu nahi zen-eta.

Esan bezala, borrokaldi bateratua izan zen, eta kide askok hartu zuen parte. Ainhoa Mujika egiatarrak antzerako klabetan hauteman zuen Fleuryko aurrez aurrea:

(Ainhoaren testigantza)

Eta borrokaren mataza askatzeko modu ezberdinak daudela frogatzeko edo, La Santé-tik ihes egin zuen Ismael Berasategi kideak 2002ko abuztuan. Sargoriak lagunduta edo, bere anaia bikiak hartu zuen Ismaelen tokia parleur-eko bisita amaitzean, eta gisa hartan kaleraino joan zen. Alain Jégo, espetxeko zuzendariak ahoa bete hortz geratu zen bi egun beranduago, Joxean Berasategik idazki bat helarazi eta trukaketaren berri eman zionenan. Seguritate goreneko makinariak ezin du mugatu anaiartekotasuna.

## **Gorrotoa lege,** *bat*

Espainiar eta frantziar estatuek epaitegien zentralizatzeak eta lege aldaketak burutu dituzte azken urteotan. Zehazkiago, 1996. urtean Espainian eta beranduago Frantzian egin ziren moldaketa legalek izugarri murriztu dute euskal preso politikoen eskubideen esparrua. Kode Penal berriak onetsi zirenetik, apurka apurka sortu da zigor-doktrina berria, unean uneko alderdi-interesei lotutako gorrotobidea ireki eta janzkera legala erdietsi duena.

Lege aldaketei dagokienez, 1996. urtetik aurrera, espainiar poliziek atxilotutako euskaldunek ordura artean indarrean zegoen 1973ko zigor kodearekin ezartzen zizkien zigorrak baino luzeagoak pairatzen hasi ziren. Halaber, espetxe zigorraldi gogorrena hogeita hamar urtetan mantentzen bada ere, kode berri honekin zigortuek erredentzioak lortzeko aukerak galdu zituzten.



Itun antiterroristaren beroan, 1996an onartutako zigor kodeari erreforma berriak egin zizkioten 2003. urtean. Ondorioz, espetxeratutakoen gehienezko zigorraldia hogeita hamarretik berrogei urtera igo zuten. Nahikorik ez, eta zigorren 3/4ak edo 2/3ak espetxe zigorraldi osotik, hau da, ezarritako zigor guztietatik kalkulatzen hasten dira, eta, baldintzapean kaleratzeko ordurarteko baldintzei, damutu eta salatzaile bilakatu behar izatearena gaineratu zioten.

Espetxe politikaren arloan, Espainian, esaterako, euskal preso politikoen Kolektiboaren aurkako neurri guztien kontrol osoa gobernuen esku egoteko zentralizatu dituzte epaitegiak, eta gisa guztitako eskubide urraketa berriak burutu ahal izateko aldatu dituzte legeak. Xede horrekin, Auzitegi Nazionalean zentralizatutako Espetxe Zaintza Epaitegia sortu zuten 2003an. Beraz, euskal preso politikoen eskubideen inguruan erabakiak probintzietako zaintza epaitegiek hartu beharrean, auzitegi berri horren esku geratu ziren. Esan beharrik ez dago, geroztik jarritako helegite eta salaketa guztiei entzungor egin dizkietela. Arta lodia jarri zioten eskubideen jarioari.

Hala ere, aldaketa hauek ezin zizkieten zigor kode zaharrekin kondenatutakoei aplikatu, eta, kaleratzear ziren euskal preso politikoak ere bizi osorako zigortzeko neurri berriak hartu zituzten: jarduerak bi denboraldi ezberdinetan banatzea zigorra bikoizteko, espetxe zigorra bete eta kaleratu ondoren espetxeratu aurretiko sumario berriak irekitzea, aspaldiko ekintzak kode penal berriarekin zigortu nahian hastea, erredentzioen aplikapenak onartzen zituzten behin behineko ebazpen juridikoak indargabetzea, asmakizun juridiko berriak egitea...

## **Goia inoiz jotzen ez duen** *erasoen zerrenda*

Gobernuek espetxeetan etengabean egiten zuten oldarraldiei buruz galdetutua, argibide interesgarriak eman zituen Argi Perurenak, Berria egunkarian egindako elkarrizketa batean. Kolektiboaren mintzakideak alderatzen zituen errepresioaren helburuak eta euskal preso politikoen erantzuna:

> “*Gure dinamika apaldu nahi izan dute zigorrak aplikatuz, dela komunikazioak kenduz, dela diru jasoera ukatuz, dela mitarrekin zigortuz nola isolamenduarekin... Espetxeek, hots, gobernuek, amarru guztiak baliatu dituzte beti Kolektiboa zanpatzen saiatzeko. Ahalegin guztiak egin dituzte horretan eta egingo ere, euskal preso politikook, borrokan, bizirik eta sendo jarraitzen dugun heinean. Zein baldintzatan egiten ari garen? Baldintzak ezberdinak dira estatu eta espetxe ezberdinetan. Alabaina, txalotzekoa da zenbait kidek, bakartasun osoan egonik, urteetan isolamendua ezagutuz edota aitzineko borroketako ondorio eta zamarekin bizkarrean, daramatela borrokaldia aurrera.*

Frantziako eta Espainiako espetxeetako funtzionario eta arduradunen aldetik diferentziarik ba ote

dagoen galdetuta, horren esanahia termino politikoetan zedarritzen zuen:

> *Ezberdintasunak egon badaude, espetxe sistema ezberdinak eta araudi ezberdinak dituzten aldetik. Itxialdia adibidetzat hartuz, ziegatik ateratzea derrigorrezkoa da espainiar estatuko espetxeetan eta ondorioz desobedientzia moduan kontsideratzen du espetxe administrazioak. Frantses estatuko kartzeletan, aldiz, araudiak ziegan gelditzeko aukera baimentzen dio presoari. Hortaz, borrokamolde berdina baliatuz, guztion esfortzu eta konpromisoa oinarrian berdintsua izanagatik ere, ezberdin kontsideratua da estatu bietan, eta ezberdin zigortua ere. Hori da funtsezko ezberdintasuna. Honez gain, eskutik ederki dabiltza gobernu lagun biak. Sakabanaketa, komunikazioan murrizketak, bakartasuna, isolamendua, torturatuak izateko kideen entregak... dira, batean zein bestean, guretzat egunero ogi, eta parekideak dira zanpaketan tematzen direnean, bereziki, kartzeletan bakar-bakarrik dituzten burkideak zigortuz. Kartzelariaren jantzi koloreak funtsean ez du axola, uniformedunak dira guztiak.*

Edozelan ere, ohiko jokamoldeetan badira nabarmendu daitezkeen paradoxak, *Gotzon* Kortazarrek gomutara ekartzen digunez:

> *Azpimarratzekoa delako, esango nuke geure erreibindikazioekiko Frantziako espetxeetako zuzendari zein matoien aldetik badagoela Espainiako kartzeleroen artean antzematen ez den beste begirune mota bat. Gure bozeramale eta ordezkariekin, behintzat, halaxe izan da. Adibidez, Fleuryko borrokaldiari konponbidea ematerakoan, geure bozeramale orokorrak eta zuzendariak batera, dibisio guztietatik bira bat eman zuten, eta banan banan dibisio-ordezkariekin elkarrizketatu ziren. Gu harritu gintuen hala gertatzeak, baina matoiak zur eta lur zeuden. Geure izaera politikoa ukatzerik ez zegoen. Dena dela, espetxe askotan erabiltzen zuten kontraoldarraldia oso sibilinoa zen. Ez ikusi egiten ziguten. Gure eskakizunen aurrean, ez entzunarena. Geure plante eta protestaldiei, entzungor. Existituko ez bagina bezala. Ez zelan ere, erantzunik ez. Hori ere gogorra da. Dena dela, batzuk eta besteak bereizten dituen elementu nagusia gatazkaren parte sentitzea edo ez sentitzea da, izan ere, guztiak jendaila arriskutsua izanda ere, daukaten pertzepzio ezberdinak moldatzen du beren jardunbidea.*

Abagune hartan, muturreko egoeraraino eraman zituzten euskal preso politiko asko. Horren muturreraino, non, hainbat kasutan, neurri bereko erantzun dinamikekin odola gatzatu zitzaion Euskal Herriari. Geratera haietako bat Jesus Mari Etxeberria Oreretako euskal preso politikoak 2003ko apirilaren bukaeran hasi zuen gose greba luzea izan zen. Bera eta Bittor Goñi kidea jipoituak izan ziren Valdemoron, eta egoerari aurre egiteko zein isolamenduzko modulotik ateratzeko abiatu zuten protestaldia berrogeita hamargarren egunaz goiti eraman zuen Etxeberriak.

Valdemoroko zigor moduloan egonik, apirilaren 7an Etxeberriak eta Goñik garbiketa protesta bati ekin zioten beraien isolamendu egoera salatzeko. Baina probokazio eta jipoiak ez ziren amaitu, eta horrela Goñik sufritutako jipoi bati erantzunez, apirilaren 23an garbiketa grebari gose eta egarri greba gehitzea erabaki zuten bi kideek. Hurrengo egunean Valdemoroko





***Jesus Mari Etxeberria GOIERRI eta elkartasunezko mobilizazio bat.***

espetxean zeuden beste presoak ere borrokari lotu zitzaizkion. Elkartasunaren eztanda modulo guztietara zabaldu zen:

**Gose eta egarri greba:**
Gotzon Aranburu *(Hernani)*, Juani Lizaso *(Donostia)*, Gorka Martínez *(Urduliz)*, Gotzon Beloki *(Durango)*, Mikel Jauregi *(Deustua)*, Gorka Lupiañez *(Durango)*, Jorge Olaitz *(Iruñea)*, Mikel Aiensa *(Aitzoain)*, Patxi Ruiz *(Burlata)*.
**Gose greba:**
Asier Urretabizkaia *(Orereta)*, Iñaki Ramos *(Zalla)*, Xabier Aiestaran *(Donostia)*, Sebas Etxaniz *(Elgoibar)*, Karlos Almortza *(Andoain)*, Iñaki Bilbao *(Lezama)*, Jon Crespo *(Galdakao)*, Alberto Viedma *(Iruñea)*.
**Txapeoan:**
Gorka Zulaika *(Pasai Antxo)*, Iker Zubia *(Gasteiz)*, Ismael Arrieta *(Gasteiz)*.

Beste kartzeletara ere iritsi zen elkartasunaren olatuak topatu zuen atseden, azkenean, eta bai Etxeberriak, bai gainerako kideek, berreskuratu zuten bizimodu lasaia. "Halako erabakiak ez dira hartzen zirriki-marraka", kontatzen zuen gose greba luzeak egin dituen kide batek. Are, "egundoko sufrimendua da, eta herioari aurre egingo diozula onartu beharra dago ezer baino lehenago".

Eskubideen defentsa eta isolamenduaren kontrako borroka mugagabea ari ziren burutzen, garai bertsuan, Turkiako ezkerreko antolakundeetako preso politikoak. Ankarako gobernuak banakako ziegetan sakabantu nahi izan zituen eta, ondorioz, gose greban hasi ziren ehunka militante. Ehundik gora hil ziren 2002. eta 2003. urteetan, tartean euren senitartekoak ere bazeudelarik. Haatik, ez ziren modu horretan protesta burutu zuten azken preso politikoak. Behin baino gehiagotan sentitu dugu gure azalean besteei egindako mina, Olatz Caminosek azpimarratzen duen bezala:

Preso zaudenean, sentimendu bereziarekin bizi duzu beste zapalduen egoera, hurbiltasun berezi batekin, haiei soka batekin loturik izango bazina bezala. Preso izan nintzen sei urteetan, bizi izan nituen egoerak non benetako barne mina izan nuen gertaera batzuen aurrean. Horietako





**Gose greban egonda, poliziak kartzela barruko oldarraldi batean hildako militante turkiar baten gorpua ezkerrean. Ondoan, gose grebalari bat. Zein baino zein irudi hunkigarriagoa.**

bat izan zen Turkiako kartzeletako lege berrien eta egoeraren kontrako protestak izan zirenean. Ni orduan sartu berri nengoen Soton, eta moduloan GRAPOko bi kidek gose greba amaigabea hasi zuten Turkiako presoekin elkartasunean. Horietako batek 20 urte zermatzan espetxean eta goizetan, moduloko komunean, botaka egiten zuen ezinean, hainbeste gose grebaren ondorioz gorputzak ez baitzion onartzen ura. Nik izuturik begiratzen nion niretzat beste dimentsio batekoa zen egoera bati. Baina ez zen izan bakarrik Turkiarren borroka hura. Oroitzen dut ere zer sentitu nuen maputxeen egoerarekin eta espetxeraturik zeuden maputxeen borrokak oihartzuna izan zuenean. Preso egote soilarekin haien alde zerbait egiten ari nintzela sentitu nuen.

## **Espetxe politika** *madarikatua*




Alderdi Popularren azken hatsari erreparatuta, euskal preso politiko zein beraien senitartekoen oroimenean orbain sakonak uzti zituela onartu beharrean gaude. Bi urtetan, bost hildako.

Ramon Gil Ostoaga izan zen, 2002ko urriaren 23an bere buruaz beste egin zuen Legazpiko preso ohia. Aste batzuk lehenago aske utzita, amarru juridikoak asmatu zituzten, berriro




espetxeratzeko asmoarekin. Zurrunbilo mediatikoaren erdian, Ramonek eskopeta hartu eta sorterriko ingurumarietan tiro egin zion bere buruari. Borrero lanak era askotara neurtu daiteke, egia esanda, eta kasu hartan legez kalean egon behar zuen preso baten kontrako enbata kriminalak berriro espetxeratzea edo desagertaratzea zuen helburu.

Osasun eskubidearekin beti borrokan, Kepa Minerren kasuak ezerk baino hobeto erakutsi zigun gobernuaren eta epaileen jokamoldea. Aspalditik zuen arnas ahalmena ehuneko hirurogeita hamarrean murrizten zion birika gaixotasuna, baina bere egoera bueltaezina izan zen arte ez zuten askatu. Hernanira itzuli zenerako, berandu zen *Txalaka* kidearentzat, eta ospitaletik ospitalera ibili ostean, urtetan dendari izan eta Herreran ere lehen moduloko ekonomatoa txintxo demonio eramaten zekien laguna galdu genuen betiko, 2004ko apirilak 26 zituela.

Dena delarik ere, dispertsioaren erruletan herioaren bolatxoak egindako ibilbideak markatu zuen Aznar presidentearen hondarreko zerbitzu-orria: bederatzi hilabatetan hiru senide hil zireneta Espainiako errepideetan.

2003ko otsailaren 28an, Argi Iturralde eta Iñaki Balerdi, Juankar Balerdi preso lasartearraren ama eta anaia hil egin ziren Albaceten izandako auto istripuan, Almeriako kartzelara zihoazen senitartekoa bisitatzera. Autoan zihoan presoaren aita Joxe Balerdi, ospitalera eraman zuten, egoera larrian.





***Argi Iturralde, Iñaki Balerdi eta Sara Fernandez.***

Urtea amaitu aitzin, azaroaren 29an hain zuzen, Sara Fernandez, Iruñeako Donibane auzoko hogeieta hamalau urteko emakumezkoa eta Iñaki Etxeberria euskal presoaren laguna hil egin zen Aranda de Dueron izandako auto istripuan. Valdemorora zihoan bisita egitera. Berekin autoan zen Izaskun Urkijo, berriz, Iker Zubia bere mutil laguna bisitatzera zihoala, larriki zaurituta ingresatu zuten Valladolideko ospital batean.

> “*Eser zaitezte ezagutzen duzuen familiar horren aldamenean, jolas ezazue preso horren seme edo alabarekin eta konparti itzazue euren bizipenak. Era horretan ulertuko baituzue benetan, dispertsioa ez dela soilik kilometroetara mugatzen.*

Hitz hauekin gonbidatzen gintuen Amaia Sarrionaindiak "Lunaren gozitiri" liburuko atariko tartetxoan, sakabanaketaren errealitatera hurbildu nahi izatekoan, beronen dimentsio itzel eta krudelaren alboan, milaka pertsonen bizipenak -gozoak zein mingotsak- ezagutu genitzan. Ikuspegi horretatik urratzen dizkigu barrenak estatuen espetxe politikak. Sufrimenduaren irrazionaltasuna aspaldi oinperatu genuen arren, zaila da hotz jokatzea gehien maite dituzunak ur-zurrunbilo horretan kiribilka ikustean. Eta halere, guk eta gure senideek jakin izan dugu minari aurrea hartzen. Minaren minez, mende sekula har ez gaitzaten. Eta hala izango da aurrerantzean ere.

## **Gazteentzako** *espetxeak*

2002ko urtarrilean adin txikikoen lege berria onartu zuten Espainian. Aldaketa honetan onurak ikusten zituztenak aurki geratu ziren aho bete hortz onartutako aldaketekin. Nagusiki, hiru aldaketa mota bereizi daitezke. Lehena, legeari "azpi-lege" moduko bat erantsi ziotela. Bertan, haiek *terrorismo* deitzen duten delituak egitearen ordaina, gogo eta modu biziz lantzea eta zigortzea erabaki zuten.
Bigarrenik, delitu hauek Espainiako Auzitegi Nazionalean horretarako apropos sortutako epaitegiak bere gain hartzea erabaki zuten. Hirugarrenik, 18-21 urte bitartekoak legedi horretatik kanpo uztea adostu zuten. Horrek guztiak, "terrorismo delituak" epaitzeko helduen Zigor Kodea oinarritzat hartzea ekarri zuen.

Euskal Herrian badaude eskema juridiko horren baitan diseinatutako bi gazte kartzela. Zumarragakoa ireki zuten lehenbizi (Ibaiondo deitutakoa), eta ETAk leherrarazi zuen 2001. urtean. Berriro inauguratuta, Hendaiako espetxe berriarekin batera osatzen dute gazteak espetxeratzeko euskal azpiegitura. Gazte kartzelak dira.

Beste kasu askotan legez, Aznar presidente ohiak hitz gutxitan azaldu zuen zentro hauen hel-



***Zumarragako espetxea. ETAk zartaratu eta geroko irudia.***

burua: "*Terrorista beti da terrorista, adin txikikoa izan arren*". Irizpide hau oinarri, Espainiako legedia eskuan, larriagotzat har liteke "helburu terroristekin" kristal bat haustea, emakume bat bortxatzea baino. Legedi orok ezinbesteko duen berdintasun eta proportzio printzipioak hausten ditu lege honek.

Izen eufemistiko ugari bilatu bazaien ere, kartzela hauek eredu zuzentzaile klasikoari jarraitzen diote, hau da, zigorraren absolutizazioa egiten dute. Helduentzako kartzeletan bezala, ordainsari eta zigor bidezko sari sistema daukate. Integrazioa eta kolaborazioa dira, finean, bergizarteratzerako kredentzialak. Bertatik pasatu den euskal gazte batek halaxe deskribatzen zuen ohiko bizimodua:

> *Kartzela honetako biziaren gidari dira faxismoa eta autoritarismoa. Gehien erabiltzen duten esaldia: 'porque me sale de los cojones'. Eguna hastearekin bat, kartzeleroek euren legea inposatzen dute mehatxupean. Eurak esandakoa jan behar duzu, eurak esaten dutenean, eta eurak esandako neurrian. Aisialdirik ez da, gauean ziegetan sartu orduko argia emendatzen dute. Patiora bi egunez behin irten gaitezke eta ordu eta erdi soilik (bi ordu da gutxieneko legala). Behin patioan, ezin dugu paseatu, ezin dugu irakurri,... eurek esandakoa soilik egin dezakegu. Euren esana bete ezean, bakartzea da zigorra eta gurea den guztia kentzen digute: arropa, liburuak, koltxoia. Hala igarotzen da gure denbora, euren esklabu izanez.*

Delitu terroristak burutzeagatik euskal gazteak espetxeratzen ohi dituzte Madrilen dagoen Los Rosaleseko kartzelan. Bertan, gertakari sekuentzia amaigabea nozitzen dute, den-denak kutsu berekoak. Gaztesarea-n aletuak azaldu zizkiguten berriki:

> *Zigor etengabeak jasaten dituzte: ohe gainean kantzontzilotan irakurtzen egoteagatik, kartzelariei gustatzen zaien moduan ez orrazteagatik, kartzelariek nahi duten guztia ez jateagatik, kartzelariei*

*gustatzen zaien bezala ez janzteagatik (debekatuak dituzte Euskal Herriarekin zerikusia duten kamisetak) kartzelariak nahi dituzten aktibitateetan ez aritzeagatik, edo kartzelariek eskatzen dieten gogoa ez adierazteagatik, beste kideekin gauzak elkartrukatzeagatik edo beste edozeini gauzak eskaintzeagatik eta abar luze bat. Kartzelariek nahi dutena egiten badute finalistak bihurtzen dituzte, ohera beranduago joaten uzten diete, erlojua, lepokoa, belarritakoak eta horrelakoak eramaten uzten diete, eta berez eskubideak diren beste zenbait gauza ere onartzen dizkiete. Beraz, denbora zati gehiena zigortuta pasatzen dute.*

Zigor gogorrak jasoz gero, isolamendura bidaltzen dituzte, jakina. Daukaten guztia kentzen diete eta soilik liburu bat, boligrafo bat, eta zenbait folio uzten dizkiete, koltxoia ere kentzen diete egunean zehar, komisaldegian edota Francoren isolamendu moduluetan bezala. Miaketa ugari jasaten dituzte, gauerditan ere bai, ziega hankaz gora uzten dietelarik. 45 minutuko bisita bakarra dute astero, eta hamar minutuko bi telefono dei dituzte astero soilik. Horrez gainera, beren gurasoen egoera ere aipatzekoa da, zeren adin txikikoen legeak hauek ere kondenatzen baititu. Ordaindu beharreko kalte-ordain izugarriak nahiko ez balira, asteburuero joan behar dute bisitan. Derrigorrez aitak edo amak egon behar du bisitan, bestela gainontzekoak ezin dira sartu.

## **Duintasun testigantzak** *eta Hausnarketa Nazionala*




***Kursaal aretoan AAMko kideek egin zuten batzar nazionalaren une bat.***

Donostiako belodromoan burututako "Duintasun testigantzak" ekitaldia 2003ko ekainean egin zen. Bere lehen helburua azken barne eztabaidaren berri ematea izan zen. Areago, Kolektiboak berak deituriko ekitaldia isolamendu politikoa apurtzeko saiakera ere bazen. Presoen Kolektiboak beste eragile politiko bat izan nahi du euskal jendartearen baitan. Gainontzeko eragile sozio-politikoekin harremanak lantzeko mintzakidetza izendatu zuela aditzera eman eta gogora ekartzeko milaka pertsona bildu zituen Donostian.

Horrekin batera, "Duintasunezko testigantzak" ekitaldia presoak isolamendu egoeratik ateratzeko beste urrats bat izan zen. Liburu honetan zehar askotan errepikatu dugun bezala, garai gogorrenean ere klabe ofentsiboan erantzu-




ten asmatu behar izan dugu, eta ziklo politiko berri baten atarian genunden hartan, lehengo lepotik burua ginela ikustarazi genien, bai gobernuei, bai giza eskubideen aldeko gidoi zimurtu eta mugatuan eroso sentitzen diren eragileei.

2003. urteko amaieran Amnistiaren Aldeko Mugimenduak Hausnarketa Nazionala burutu zuen, Euskal Herriko beste eragile askorekin batera Euskal Preso Politikoen Kolektiboak azken eztabaidan ondorioztatutako puntuekin bat eginez. Horren ondorioz, Amnistiaren Aldeko Mugimendua osatzen duten elkarte eta antolakundeek zein beste eragileek bat egin zuten Euskal Preso Politikoen eskubide politikoen aldeko borrokan.
Herri batzarrak izan ziren hausnarketaren oinarriak. Aldi berean eragile sozial eta politikoekin harremanak egon ziren, interpelazio zabal bat eginez, nazio eta herrialde mailan batez ere, 60 eragile ezberdinekin. Gogoetaren abiapuntua, Euskal Preso Politikoen Kolektiboa beraren eztabaida izan zen alde batetik eta Euskal Herriak bizi duen egoera politikoa bestetik. Beraz, Anoetako Belodromoa eta Kursaaleko batzarra EPPKren aurrerepausu berri baten irteera pistak izan ziren. Izan ere, Kolektiboaren antolaketa eta koordinazioan pausu berriak ematea erabaki zen, eta urrats horiek Kolektiboaren izaera politikoa eta eragiletza artikulatzeko xedea eduki zuten. Emeki gauzatuko den prozesu baten garapena ikusgai zegoen jadanik

# Bederatzigarren epealdia

2004-2008




*Inputazio berriak eraikitzea beharrezkoa bada, inputazio berriak eraikitzen dituzte*

Juan Fernando Lopez Aguilar,
PSOEko justizia ministroa

Inork gutxik espero zuena gertatu zen 2004ko espainiar hauteskunde legislatiboetan, izan ere, M-11ko atentatuek, kalteturiko pertsonez gainera, PPko gobernua ere aurretik eraman zuten, Aznarren ordezkoa zen Rajoyren itxaropenak kolpe bakar batez zapuztuz. ETAri egotzi eta, ekintza haien aitzakitan, ezker abertzalea suntsitu nahi izate hark gezur galantak asmatu eta denboran eustera eraman zuen PP. Egia jakitean, sinesgarritasun guztia galdu zuten eskuin muturreko politikariek, eta PSOEko hautagaia zen Rodriguez Zapaterok presidentziaren oparia espero gabe jaso zuen, gobernatzeko prest ez zegoela. Beste behin ere, Euskal Herriaren kontrako gerraren eszenatokian gure etsaien gorpuak pasatzen ikusi genituen, eta Espainiako presidente batek gatazka demokratikoki gainditzeko aukera historikoa xahutu zuen. Borrokaren beharra inoiz baino beharrezkoa zen une hartan, Kolektiboak egin zuen bere ekarpena.

## **M.11:** *zakur amorratuen aitzakia*

Martxoaren 11ko goizeko lehen orduan talde islamista batek egindako ekintza armatu entzutetsuak Madrilgo zibilak hartu zituen jomugan, eta tren geltoki zein bagoietan eztandarazitako lehergailuek ia berrehun pertsona hil zituzten. Egundoko sarraski horren ondorioak, ordea, euskal preso politikoengana iritsi ziren zuzen-zuzenean lehen ordu zein egunetan politikariek eta kazetariak xaxaturiko giroa zela medio. Hamarka lirateke kontatzeko moduko pasadizoak, baina gertakarien ondorioz Alcala-Emakumeak espetxean emandako bizipenak ekarri nahi izan ditugu lerrootara, aski argigarriak direlako:



*"Eztanden berri zabaldu zen une beretik, modulu guztietako burnizko barrotedun ateak zabalik mantendu zituen kartzelak, honela modulu guztietako jendea (sei modulu daude guztira espetxean) euskal preso politikoak gauden bi modulutara etor zitezkeen gurekin sartzera.*
*Enkartelada antzeko bat egin zuten gu geunden bi modulutan. Irainak, mehatxuak..., bertan parte hartu zuten kartzelako "edukadora" eta argazkilaritzako monitoreak. Jendeak erratza makilak zituen eta kartzelako "langileriaren" babes guztia zutela ikusirik, enkartelada oso gogorra burutu zuten gugandik bost metrotara.*

*Bazkal orduan arazoak gehitu ziren. Ez ziguten janaria zerbitzatu nahi, janaria bota ziguten preso sozialek. Hau guztia bospasei kartzelero, zerbitzuburua eta segurtasuneko zuzendariordearen aurrean gertatu zen. Arratsaldean modulu bateko kide guztiek kiroldegira joan ziren. Bertan bi kide eta grapokide bat jipoitu zituzten. Bidenabar, polarrak, riñonerak, walkmana...,lapurtu zizkiguten. Erasoaldia kartzeleroen begien aurrean gertatu zen. Ondoren, arrunt batzuk kontatu zigutenez, kartzelero batzuk lasai ibiltzeko esan omen zieten, edozer gertatuta ere ez zietela kartzela zigorrik jarriko eta.*
*Isolamenduko modulura eraman gintuzten kartzelan geunden hamasei euskal preso politikoak eta bi grapokideak. Teorian gu babesteko erabili zuten neurri hau. Bertan, medikuaren jarrera guztiz salagarria iruditu zitzaigun. Jipoi osteko kolpe, zauri, zein burusoildurei kasu eskasa egin zien. Astelehen goizalderarte egon ginen isolamendu moduluan, 75.2 artikuluarekin. Asteburuan preso sozial batzuk etorri ziren isolamenduko atera mehatxatzera. Gure senideen datu guztiak zituztela eta hilko zituztela esanez.*

Halako gertakizunak nonhai eman ziren. Ibarretxek aurreratu zuenak ondorio praktikoak izan zituen, piztiak bagina bezala tratatu gintuzten-eta. Bestela, kartzela arduradunek bultzatu zuen kideak jipoituak, mehatxatuak eta irainduak izatea. Eta hau gutxi balitz, aitzakia berekin eskubide murrizketa eta trasladoak burutu zituzten. Azken batean, urteak beratzen zeraman egoera baten isla baino ez zen izan hura. Euskal preso politikoak kartzelatik inoiz irten ez zitezen erabaki berriak iristear baitzeuden.

## **Gorrotoa lege,** *bi*

*Parot doktrina* izenaz ezagutzen da Espainiako Auzitegi Gorenak 2006ko otsailaren 28an ebatzitako sententzia. Haren aplikazioaren ondorioz, presoen kartzela-zigorrak batu egin daitezke, inolako murrizketarik gabe, legeak ezartzen duen gehienezko kartzelaldia 30 urtekoa (2003ko Zigor Kodearen erreforma baino lehen gertatutako karguak epaitzen badira) edo 40 urtekoartekoa dela kontutan izanik.

Baina lege-moldaketa honek bazuen aurrekaririk. 2003an, 1996ko zigor kodeari erreformak egin zizkioten. Batetik, euskal preso politikoentzat, espetxe zigor topea 30 urtekoa izatetik 40 urtekoa izatera pasa zen. Halaber, espetxe zigorraren 3/4ak edo 2/3ak espetxe zigor topetik baino kondena osoetatik kalkulatzen hasi ziren, hau da, lehen bezala espetxean igaro beharreko denboratik kalkulatu beharrean, jasotako kondena guztietatik kalkulatzen hasi ziren. Praktikan, beraz, euskal preso politikoei 3/4ak edo 2/3ak beteak izan ostean kaleratzeko aukera ukatzen jarraitu zuten.



*Unai Parot, familiarekin.*

Frantziar estatuari dagokionez, bizi osorako zigorraldia legeztatua dagoela gogoratu nahi dugu. Bizi arterainoko espetxe zigorra jasotakoek, lehen, 15 urte espetxeraturik igaro ostean, eta, lanpostua eta etxebizitza ziurtatua izanez gero, kalera irteteko aukera zuten. Gerora, ordea, askatasun eskaera egiteko epea 15 urtetakoa izatetik, 18 urtetakoa izatera pasa zen. Egun, Frederic Haranburu, Jakes Esnal eta Jon Parot ditugu bizi osorako zigortuta. 17 urte espetxeraturik daramatzan Jon Paroti ukatu egin diote askatasuna. Jakes Esnal eta Frederic Haranbuk, berriz, espetxeraturik 18 urte bete arte ezin dute askatasun eskaerarik egin. 2008. urtean beteko dituzte 18 urte espetxeraturik. Azkenik, atxilotu zutenetik hemeretzi urte igaro ondoren espetxetik irten zen Filipe Bidart 2007ko otsailean. Alta, Okzitanian bizi behar du halabeharrez, zazpi urte pasatu arte ezin baitu Euskal Herrira itzuli.

Halaber, frantziar Estatuan ere euskal preso politikoak ahalik eta denbora luzeenez espetxeraturik mantentzeko kondenak gogortzen ari dira. 10 eta 30 urte arteko espetxe zigorrak ezartzeko aukera ezarri dute. Salbuespeneko legediaren azken jauzia *Preben* Legearekin gauzatu zen, 2004. urtean indarrean sartu zen lege-tresna berri honi esker, euskaldunen kontrako prozeduren kalifikazioetan larrigarritzat jotzen da "erakunde armatuko" kide izatea. Ondorioz, espetxe zigorrak gogortu ziren eta kartzela zaintzarako JAP sortu zen, ezarritako zigorrak oso-osorik bete daitezen ahalegintzen den egitura berria.

Hogeita lau euskal preso politikori jada Auzitegi Gorenaren 197/2006 sententzia aplikatu diete eta, ondorioz, espetxe zigorra oso-osorik bete arren, bahiturik mantentzen dituzte. Halaber, beste hainbat presori, kondena oso-osoa betetzean aipatu sententzia aplikatuko dietela jakinarazi diete. Ondoko 24 euskal preso politikoak preso mantentzen dituzte, 197/2006 sententzia aplikatu ostean, espetxe zigorra oso-osorik beteta izan arren.

## BAHITU POLITIKOEN ZERRENDA

**1) JOSE IGNACIO GAZTAÑAGA BIDAURRETA:**
Auzitegi Gorenako 197/2006 sententziaren irizpidea aplikatuz, Iñaki Gaztañaga 2018rarte ez askatzea erabaki du Espainiako Auzitegi Nazionalak. Inposatutako espetxe zigorra osorik beteta, 2006ko martxoaren 29an askatu behar zuten Gaztañaga baina kaleratze data 2018ko martxoaren 21era atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**2) TXOMIN TROITIÑO ARRANZ:**
Inposatutako espetxe zigorra osorik beteta, 2006ko maiatzaren 5ean askatu behar zuten Troitiño baina kaleratze data 2017ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**3) JOSEBA ARTOLA IBARRETXE:**
Inposatutako espetxe zigorra osorik beteta, 2006ko maiatzaren 18an askatu behar zuten Artola, baina kaleratze data 2016ko urriaren 10era atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**4) JESUS BOLLADA ALVAREZ:**
2006ko maiatzaren 20an askatu behar zuten Bollada, baina kaleratze data 2017ko urriaren 3ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**5) PATXI GOMEZ LOPEZ:**
2006ko ekainaren 14ean askatu behar zuten Patxi, baina, kaleratze data 2018ko irailaren 19ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**6) ANTXON LOPEZ RUIZ:**
2006ko uztailaren 24ean askatu behar zuten Antxon baina kaleratze data 2017ko urtarrilera atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**7) TXERRA MARTINEZ GARCIA:**
2006ko abuztuaren 24n kaleratu behar zuten, eta kaleratze data 2011ko urriaren 19ra atzeratu diote, 20 urteko zigorra osorik bete arte.

**8) KOLDO HERMOSA URRA:**
2006ko irailaren 8an askatu behar zuten Koldo baina kaleratze data 2017ko irailaren 8ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**9) PEIO ETXEBERRIA LETE:**
2006ko irailaren 10ean askatu behar zuten Peio baina kaleratze data 2019ko apirilaren 8ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**10) KANDIDO ZUBIKARAI BADIOLA:**
2006ko urriaren 26an askatu behar zuten Kandido baina kaleratze data 2011ko urriaren 25era atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**11) JON AGIRRE AGIRIANO:**
2006ko urriaren 28an askatu behar zuten Jon baina kaleratze data 2011ko maitzaren 3ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**12) JON ANDER URKIZU ORMAZABAL:**
2007ko uztailaren 22an askatu behar zuten Ander baina kaleratze data 2016ko irailaren 10era atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**13) LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI:**
2007ko urriaren 8an askatu behar zuten Azkargorta baina kaleratze data 2018ko apirilaren 8ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

## BAHITU POLITIKOEN ZERRENDA

**14) KEPA REZABAL ZURUTUZA:**
2006ko abenduaren 30ean askatu behar zuten Rezabal baina kaleratze data 2016ko abenduaren 19ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**15) FERNANDO DE LUIS ASTARLOA:**
2007ko martxoaren 24ean askatu behar zuten Fernando baina kaleratze data 2017ko martxoren 16ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**16) ANDONI ALZA HERNANDEZ:**
2006ko azaroaren 9an askatu behar zuten Andoni baina kaleratze data 2018ko irailaren 30era atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**17) JUAN MARI GABIRONDO AGOTE:**
2007-12-01ean bete zuen, baina 2016-11-08 arte atzeratu diote irteera data.

**18) PAKITO LUJANBIO GALDEANO:**
2007-12-30ean bete zuen. Baina, Entzutegi Goreneko 197/2006 sententzia aplikatuta, irteera data 2014 arte atzeratu diote.

**19) JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA:**
2008-04-11n bete du, baina, Entzutegi Goreneko 197/2006 sententzia aplikatuta, irteera data 2015-06-24 arte atzeratu diote.

**20) IMMA PACHO MARTIN:**
2008-03-11n bete du zigorra, baina, Entzutegi Goreneko 197/2006 sententzia aplikatuta, irteera data 2021era atzeratu diote.

**21) JUAN KARLOS PEREZ OJUEL:**
2008-04-16an bete du, baina, Entzutegi Goreneko 197/2006 sententzia aplikatuta, irteera data 2009-08-19 arte atzeratu diote.

**22) ANDER MITXELENA:**
2001etik baldintzapeko askatasunean aurkitzen da Martutenetik atera ondoren, Bilboko Zaintza epaitegiak baldintzapeko askatasuna eman zion. Ondoren baldintzapeko askatasunean kondena betetzen joan da eta aurtengo otsailaren 25ean lizentziatu behar zuen Kode Penal Zaharraren arabera. Kalean dagoelarik kondena luzatu diote 2014rarte, hau da197/2006 doktrina aplikatu diote. Oraingoz kalean da.

**23) PELLO ODRIOZOLA:**
Tolosarra, 1988ko urtarrilaren 28an atxilotu zuen polizia nazionalak. 30 urteko espetxe zigorra ezarri zioten eta erredentzioak kontuan izanik 2008ko uztailaren 2an aske gelditu behar zuen. 197 / 06 doktrina aplikatu diote eta irteera data berria ezarri diote, 2018ko urtarrilak 19rako hain zuzen ere.

**24) INES DEL RIO:**
Tafallarra, 1987ko uztailaren 5ean atxilotu zuen espainiar poliziak. 30 urteko espetxe zigorra ezarri zioten, eta erredentzioak kontuan izanik 2008ko uztaileko 2an zen kalera ateratzekoa.Auzitegi Nazionalak bere zigorraren likidazio berria eskatu zuen, 197/06 doktrina ezartzeko.

“

Legez ez lukete oraindik kalean egon beharko, baina, unea iritsita, ez dituzte askatuko ondoko kideak, haiei ere ezarri baitiete legedi berria:

**1) UNAI PAROT:**

Inposatutako espetxe zigorra osotasunean 2011n beteko du. Entzutegi Goreneko 197/2006 sententzia aplikatuta, ordea, irteera data 2020 urte arte atzeratu diote.

**2) JABIER ZABALETA ELOSEGI:**

Jabier Zabaletak irteera data hurbil eduki ez arren, Auzitegi Gorenako 197/2006 sententziaren irizpidea aplikatu dio Espainiako Auzitegi Nazionalak. Kaleratze data atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**3) JOSE MARI BERISTAIN URBIETA:**

Beristaini ere Auzitegi Gorenako 197/2006 sententziaren irizpidea aplikatu dio Espainiako Auzitegi Nazionalak. Kaleratze data 2019ko apirilaren 12ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

**4) SANTI ARROZPIDE SARASOLA:**

Santi Arrozpideri, zigorren akumulazio bat egitean Auzitegi Gorenako 197/2006 sententziaren irizpidea aplikatu dio Espainiako Auzitegi Nazionalak. Kaleratze data atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte.

Gure Kolektiboak askotan gogoratu duen bezala, askapen prozesua baldintzatu nahi dute espetxe politikaren bidez, eta ahalegin horretan ez dago atsedenik. Presook espetxean bertan usteldu behar dugula esan zuen Aznar faxistak, eta Paris zein Madrilgo gobernuek urrats eragingarriak eman dituzte norabide horretan. Etengabe gainera. Hortaz, Euskal Herriaren alde jarduten dugun guztientzako mezu argia da: estatu biek preso gaituztela betiko. Logika horretan, bizi arteko espetxealdiak indarra hartu du. Dispertsiotik harago joan nahi duen espetxe politika honek areagotu zituen bere ondorioak PSOE La Moncloara itzuli zenetik. Balantzea hagitz gogorra izan da.

## **Odoluste** *amaigabea*

Zapateroren egitasmoen nondik norakoak luze gabe izan ziren bistakoak. Izan ere, espetxe politikari eutsi ez ezik, gogortzea eta euskal herritarren borondatetik are gehiago aldentzea ere izan baitzen bere lehen erabakien gakoetako bat. Talante berriaz bolo-bolo hitz egiten zen garai bertsuan, lau kide eta hiru senitarteko geratu ziren bidean. Oihane Errazkin, Jose Anjel Altzuguren, Igor Angulo, Roberto Sainz, Leo Esteban, Karmele Solaguren eta Natividad Junko.




Fleury Merogiseko espetxean, Frantzian hil zen 2004ko uztailaren 8an Oihane Errazkin euskal preso donostiarra. Bere buruaz beste egin zuela zioen autopsiak. Beste kontua da zerk bultzatu zuen itzulera gabeko halako erabakia hartzera, eta hor agertzen da euskal preso politikoak eta beren senideen aurka indarrean dagoen sakabanaketa politikaren aurpegirik krudelena. Espetxea suizidioz jositako eremua da, eta ezin esan halakoak guztiz saihestezinak direnik, baina 31 urteko donostiarra Euskal Herriko espetxeetan egon izan balitz, zaila litzateke halako bukaerarik irudikatzea; edota, besterik gabe, presoek bizi dituzten baldintzak pertsonak merezi dituenak balira.




*Kotto* Altzuguren kidea Soriako espetxean, ziegan, urkatuta topatu zuten urtebete geroxeago, urriaren 31an. Depresioak jota zegoen Altzuguren espetxeratzerako, eta psikologoek eta psikiatrek artatzen zuten. Ostiral batean eraman zuten Soriako espetxera, eta astelehenean bere buruaz beste eginda aurkitu zuten. Espetxe zuzendaria Altzugurenen egoeraren jakitun zen. Bazituen Altzugurenen osasun egoeraren berri ematen zuten mediku txostenak. Baina ez zuten artatu. *Kotto* atxilotu eta espetxeratu zuten 2001ean. Inkomunikazio aldian torturak salatu zituen Altzugurenek. Hiru urte eta erdi preso egin ondoren aske geratu zen. Baina torturek

eta espetxealdiak ondorioak utzi zizkioten. Tratamendupean zegoela atxilotu zuten berriro, jarri zioten bost urte erdiko espetxe zigorra osorik bete zezan. Hamaika egun baino ez zituen iraun espetxean.




Gertakari hitsen katea luzatu zen, bestalde, 2006ko otsailaren amaieratik martxoko lehen egunetara arte, bi kideren heriotzak eta gupidarik gabeko errepresioak astindu baitzuten euskal jendartea. Gure Herria eszenatoki demokratiko batera eraman zezakeen prozesu baten atarian geunden, gainera, Igor Angulo, otsailaren 27an, eta Roberto Sainz, martxoaren 3an, hil zirenean.

Euskal Herritik 600 kilometro baino gehiagotara zuten Igor Angulo santurtziarra, Cuencako espetxean. Bakarrik zegoen ziegan eta azken hiru urteetan Cuencako kartzelan zegoen euskal preso politiko bakarra zen. Hilda aurkitu zuten. Espetxeko iturriek zabaldu zutenez, urkatuta, bere buruaz beste eginda. Igor lurperatzen ari zirela, Roberto Sainz del Olmo euskal preso politikoa hil zen Aranjuezeko espetxean. Espainiako Espetxe Erakundeetako iturriek agertu zutenez, bihotzekoak emanda zendu zen Portugaleteko presoa. Otsailetik probak egiten ari zitzaizkion bularraldean minak sentitzen zituela-eta. Ziegakideak, beste euskal preso politiko batek, ohartarazi zien kartzelako funtzionarioei Baru ondoezik zegoela, eta espetxeko erizaindegian hil zen.




Argi dugu erantzukizun handiena Rodriguez Zapateroren gobernuarena eta alderdi sozialistarena dela. Baina sakabanaketarekiko eta sakabanaketaren ondorioekiko izugarrizko erantzukizuna du PNVk. Igor eta Roberto omentzeko bildutako jendetza jipoitzeko agindua PNVk eman zuen, eta Ertzaintzak exekutatu. Hori izan zen, finean, Ibarretxeren gobernuak eman zuen urrats bakarra. Sakabanaketarekin amaitzeko ez du tutik ere egin, nahiz eta biolentzia mota hori une oro gertatzen den kartzeletan eta PNV egon zen bere ezartze eta zabaltze plangintzaren atzean.





***Leo Esteban, Karmele Solaguren eta Natividad Junko senideak.***

Espetxe politikaren aurkian euskal preso politikoen kontrako indarkeria dago, baina ifrentzukoan beren senideak daude, eta aipatu epealdi honetan hiruk galdu zuten bizitza sakabanaketaren ondorioz.

1989ko apirilaren 9an, sakabanaketak eragindako istripua jasan zuen Leo Esteban Nietok. Anaia Puerto de Santa Maria espetxean bisitatu eta Euskal Herrirako bidean zirela Andujar parean izan zuten istripua. Istripuaren ondorioz, hanka moztu behar izan zioten tolosarrari. Orduz geroztik konplikazio ugari izan zituen istripuaren ondorioz, eta hamabost urtetan 21 aldiz pasa behar izan zuen kirofanotik. Hankan hemeretzi ebakuntza egin zizkioten eta beste bi ebakuntza aldakan. Azken aldiz ingresatu zuten aldakan oinaze handia eragiten zion eta nerbio ziatikoan presioa eragiten zion konkorra irten zitzaiolako. Azken ebakuntzaren ostean hiru hilabete eman zituen ingresatuta eta, azkenean, hil zen 2004ko ekainaren 3an, azken ebakuntzari ezin izan ziolako aurre egin.

Sei hilabete beranduago, abenduaren 6an Karmele Solaguren, Ekain Gerra preso barañaindarraren ama hil egin zen. Bere semea Alcalako espetxera bisitatzera zihoala Sorian auto istripua izan zuten Karmelek eta bere senarrak Jose Luis Guerrak. Laguntza eske telefonoz deika ari zela, autotik kanpo, beste batek bete-betean harrapatu zuen.

Orain arte gertatu den azken heriotza Natividad Junkorena izan da. Teruelgo espetxera zihoazen bere senide presoa bisitatzera, eta auto istripu larria izan zuten Errioxako Alfaro pareko autobidean. Aurretik zihoan kamioi bat errepide erdian gurutzatuta gelditu zen, eta atzetik zihoazen hainbat autoren kontra talka egin zuen, tartean euskal presoaren senideak zihoazen autoaren kontra. Kolpearen eraginez, autoa arroila batetik amildu zen, eta txiki-txiki eginda geratu zen. Istripu berean, bi pertsona zendu ziren, eta makina bat lagun ospitalera eraman zuten. Euskal presoaren gurasoak, emaztea eta amaginarreba autotik atera behar izan zituzten. Ostean, Txagorritxu ospitalera eraman zituzten laurak, eta Natividadek ez zuen gainditu bere egoera larria. 2007ko abenduaren 25an hil zen.

Pasadizo hauek guztiak aski gogorrak dira, jakina. Gogorrak bezain adierazgarriak, haatik, PSOE eta PP enbor bereko ezpalak direla baieztatzeko. Eta PNVren hipokresia sufrimendu zirimola horren sustatzailea ere badela berresteko. Nahiko genukeen azkenak izatea; zerrenda horretan izen berririk, kaltetu gehiagorik ez agertzea, baina estatuen estrategiak zaurian piko egitea bilatzen du hain zuzen ere. Gure Kolektiboa suntistu ez, geure senitartekoen unibertso amultsua garaitu ere ez, baina min egiteko espetxe politikarekin ahalik eta samin handiena eragitea nahi dute. Gorrotoa, abere gaiztoa.

## **Zapateroren** *espetxe politika*

"Oso gutxitan ikusi dut horrenbeste hitz egin, horrenbeste planta egin eta hain gutxi mugitu den mandataria", aitortzen zuen PSOEkin izkutuko hartu-emanetan jardun zuen militante abertzale batek. *Cellofan* hutsa, hori besterik ez dago Rodríguez Zapatero presidentearen inguruan, ekintzei, zifrei, errealitateari kasu eginez gero, espetxe politika eta beronen ondorioak zorroztu egin direla ukatzerik ez baitago.

Diskrezio guztiarekin bilerak egin eta elkarrenganako konfidantza puntu bat lortzearren prozesu baterako alegiazko gidoiak eta bermeak elkartrukatu ondoren, Ezker Abertzale osoak aurrera-pausu ausarta eta historikoa eman zuen, demokrazia helburu zuen jardunbidea azken bururaino eramate aldera.



"Orain Herria, Orain Bakea", ETAren su-eten mugagabea eta, oro har, gatazka gainditzeko aukera berriari koltxoi sendo bat jartzeko Ezker Abertzaleak egindako esfortzua txalotua izan zen nazioarteko estamentu garrantzitsu askotatik. Guztira ere, 2006. urteko udaberrian aldi itxaropentsu berri batek hartu zuen protagonismo osoa.

Gauzak mugitzen hasiak zeuden, jakina, baina kartzela politika lehengokoaren azala eta mamia baino ez zen. Are nabarmenago Perez

Rubalcaba ministroa eta GALa eratu zuen gabinete sozialistaren buru izandakoak bere kargu hartu zuenetik. Azter ditzagun kartzela barruko egoera neurtzeko hainbat aldagai. Hasteko eta bat, gaixotasun larriak zeuzkaten kideen egoera zein den jakiteko, Etxeratek egindako diagnostiko orokorra baliatuko dugu.

Hamabi euskal preso politikori kartzelak eragindako ala okertutako gaixotasun fisiko edo sikiko larriak detektatu zaizkie 2007. urtean. Guztien askatasuna eskatu da, beraien osasun egoerak okerrera egin ez dezan. Bat bera ere ez askatzeaz gain, 12 euskal preso politiko horietatik 4 baino ez dituzte Euskal Herrian. Ondoko lerroetan 12 kasu horien berri ematen dugu, modu oso laburrean.

**Jon Agirre:**
1942an jaioa. 1981ean atxilotua. Artrosi orokortua, hernia diskala, aldebiko miopia, hiperkolesterolemia,hiperglizeridemia, eskuineko eskuko Dupuytre gaixotasuna eta Miokardioko Bihotzeko Larriaren arriskua ditu, besteak beste.

**Bautista Barandalla:**
1964ean jaioa. 1990ean atxilotua. Kolitis ultzerosoa, espondilitis ankilosantea, bi aldeko sakroileitisa eta ultzera peptikoa ditu.

**Angel Figeroa:**
1971ean jaioa. 1994ean atxilotua. Epilepsia tenporala, eskuineko eta ezkerreko lobuloetan eragiten dizkiolarik. Konbultsio bortitzak, portaera aldaketak, oroimenean akatsak eta delirioak izan ohi ditu horren ondorioz.

**Jose Ramon Foruria:**
1949an jaioa. 2003an atxilotua. Maskuriko minbizia du.

**Marilo Gorostiaga:**
1956an jaioa. 1997an atxilotua. Eskuineko bularreko minbizia, linfedema, Diabetes Mellitusa, dislipemia mistoa eta hipertentsio arteriala ditu. Fisioterapiaren beharra du linfedema tratatzeko. Arazo larriak izan ditu tratamendu hori gauzatzeko. Halaber, ospitalerako trasladoetan, behin eta berriro, polizien probokazioak eta tratu txarrak jasan ditu.

**Gotzone Lopez de Luzuriaga:**
1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia du. Erradioterapia sesioak jasotzeko arazo larriak izan ditu, ospitalera eraman behar duten polizien jarrerarengatik. Ondorioz, 2007an, erradioterapia sesio batzuk galdu egin ditu, eta, etorkizunean, sesio horiek galdu izanaren ondorio larriak jasan ditzake, bere medikuek azaldu dutenez.

**Juan Jose Rego:**
1939an jaioa. 1995ean atxilotua. Gaitz zerebrobaskularra, Diabetes Mellitusa, hipertentsioa, retinopatia diabetikoa, kataratak eta ikusmenaren galera bi begietan, bi aldeko hipoakusia neurosensoriala, prostataren hipertrofia, B12 bitaminaren eskasia, zorabioak eta sudur odoljarioak ditu, besteak beste. Halaber, 2005ean, tronbosia jasan zuen. 2007an askatasuna ukatzeaz gain, diagnostikatua eta tratatua izateko Euskal Herriko kartzela batera ekartzea ere behin eta berriz ukatu egin diote, nahiz eta bere egoera larria izan.

**Josu Uribetxeberria:**
1956an jaioa. 1997an atxilotua. Giltzurrineko minbizia du, eta, ondorioz, giltzurrin bat erauzi egin diote. Kalean egongo balitz, bi urteko epean, gaitza birpizteko %51ko arriskua du. Espetxean egonik arrisku handiagoa du.

**Mikel Ibañez:**
Elgoibarren jaio zen, eta 2007an atxilotuta izan zen. Barrabilean duen tumorea gorputz osoan zabaltzeko arriskua duela aipatu du medikuak eta bere egoera oso larria dela adierazi dute. Halere, aske ez dute utzi, etxean eta zaintzapean preso jarraitu beharko du-eta.

Gainera, frantziar Estatuak **Domingo Aizpurua** berriro espetxeratu egin zuen arrazoi politikoengatik. 2006ean askatu egin zuen minbizia zuelako. 2007an, berriro espetxeratu zuten. Beren nahia errespetatuz, beraien izen-abizenak publiko egingo ez ditugun beste lau euskal preso politikok ondoko gaixotasun sikiko larriak dituzte: antsiazko depresioaren patologia eta oinarrizko pertsonalitatearen desoreka; nahasmen obsesio-konpultsiboa; depresio koadro larria; eta, nahasmen eskizofreniformea.

Kolektiboaren emakumezkoen egoeran ere ez da onerako aldaketarik antzeman, eta hori ere datu adierazgarria da. Bizi baldintzen okerra, espetxe barruko kokapena, sakabanaketaren gehienezko optimizazioa eta osasun eskubidearen bortxa misoginoa (ginekologia kontsultak zapuztuak batik bat) jarraitzen dute izaten garizuma baino luzeagoa den zerrenda bateko salaketak. Kolektiboko nesken egoerari begiratu bat emanda, zaila da ez asaldatzea. Olatz Caminos dugu solaskide:

“ *Sakabanaketaren inguruan hitz egin izan denetan, gehienetan, senitartekoen ikuspegitik landu izan da, itolarri ekonomikoa, bidaiak, nekeak, distantziaren ondorioak... Baina ezin dugu ahaztu sakabanaketa, lehenik eta behin, presoak berak jasaten duela. Sakabanaketaren ondorio nagusienak bakardadea eta isolamendua dira, eta EPPK-ak horiek jasan beharra, sakabanaketa politika diseinatu zutenen erantzukizuna da. Sakabanaketaren ondorioz 700 preso bi estatutako espetxeetatik sakabanatuak dira. Taldean egoteak indarra ematen du beti, espetxean zein edonon. Gizakiak taldetan antolatzen gara, hori da gure ezaugarria, bakarrik esdeuzak gara. Euskal preso politikoen kontrako jazarpena, bortxakeria eta inpunitatea areagotu egiten dira bakarrik aurkitzen direnean. Horregatik bizi dira Soto bezalako prebentiboen kartzelak bestelako indar batekin,*

*elkarren babesarekin eta elkarrengandik ikasten. Bakardadea oso gogorra da. Afektiboki suntsitu egiten du, beste gizakiekin harreman naturalak edukitzeko erraztasuna galdu egiten da. Isolamendua, gaur egun, kartzelako erregimen edo antolaketa modu gisa jasotzen da estatuetako legeetan. Baina isolamendua ez da hori. Isolamendua tortura mota bat da. Isolamedua inoiz ez da inuzentea eta beti aplikatzen da suntsitzeko asmoz. Isolamendurako, egunean 20, 22 edo 24 orduz bakar-bakarrik egoteko, inor ez dago prestatuta. Zigor psikologiko etengabe bat da eta adaptazioa oso gogorra da. Batzuek lortzen dute, baina bestetzuek inoiz ez. Gaixotasunak berehala azaltzen dira, urduritasuna, jan ezina, lo egin ezina, antsietate arazoak... eta epe luzera, baita gaixotasun larriagoak ere. Isolamendua euskal preso politikoak behin betiko gaixotzeko, suntsitzeko eta psikologikoki ahultzeko estatuak baliatzen duen arma bat da. Zigor bat da, oso koste altuak dakartzan zigorra. Sakabanaketa eta isolamendua sostengatzeko ez dago arrazoirik, ikuspuntu guztietatik guztiz onartezina da. Mantentzen diren bitartean, ezin izango da inoiz normaltasunaz, bakeaz eta biolentzia ezaz hitz egin.*



**Sotoko patioan egindako talde-argazkia. Masifikazioa da bertoko arazoa, baina ohikoena kide emakumezkoen muturreko isolamendua eta bakardadea da.**

Brievako kartzela ezagunaz gainera, espainiar estatuan emakumezkoentzat badago Alkala-Emakumeak espetxea ere, izan ere, zuzendari ezberdina eta guztiz aparteko funtzionamendua baitu Alkala-ko gizonen espetxearekiko. Sevillan ere badago, Alcala de Guadairan, baina hara ez dute euskal preso politiko emakumerik bidaltzen. Beraz, Brievan eta Alkala-Emakumeak dira egungo espetxe politikaren laborategiak. Azken urteotako egoera baloratzeko, Olatzi emango diogu, berriro ere, hitza:

“*Brievan urte eta erdi eman ondoren, ez dut ikusten ezberdintasunik emakumezkoen kartzela baten eta kartzela mixto baten artean. Espetxearen funtzionamendua berdin-berdina da, lege berdinak jarraitzen dira, normatiba berdinak, jarduera berdinak, zigor mota berdinak, eta jokamolde berdinak funtzionarioen aldetik. Emakumezkoen espetxea izanik, gainera, bazeuden ezaugarri sintomatiko*

*batzuk: zuzendaria eta ardurazko funtzionario guztiak gizonezkoak ziren; ginekologoa lortzeko kexa ugari sartu genituen epaitegian eta hala ere ez genuen lortu hilabetean behin etortzea eta ez dago haurdunentzako edo haurrentzako modulo berezirik (haurdun geratzekotan espetxez aldatzen dituzte). Alkala-ko espetxean, ere, ez dago ama direnentzako modulorik. Hauek badira Estatu espainolean emakumezkoentzako dauden espetxe bakarrak, zergatik ez dituzte emakumeen beharrizanak egoki betetzen?*





***Begoña Sagarzazu (Tenerife) 1989, edota Eva Forest (Yeserias) 1975an. Emakumezkoen espetxe-indarkeria nolako den neurtzeko bi adibide.***

Arazo nagusia da, estatu espainolean justizia bera, lege penala eta penitentziarioa bera dela sexista. Eta lege horren pean funtzionatuko duten egitura, espetxe eta arau guztiak sexistak izango dira, eta emakumearen baztertzea ekarriko dute ondorioz. Europako beste estatu batzuetan, Britainia Handia kasu, delitu baten aurrean zigortzerako orduan, onartuta daude espetxeaz gain beste neurri zigortzaile batzuk (gizarterako lanak, etab). Neurri zigortzaile horiek, kasu askotan, emakumeen kasuan aplikatzen dira. Horrela, kontuan hartzen da delitua egin duen emakumeak zenbat senitarteko dituen ardurapean, zenbat seme-alaba, diru-iturri bakarra den sendian, eta gisa horretako hainbat baldintzapen. Horrela, deserrotze soziala ekiditen da eta marginazioari bidea ixten zaio neurri batean. Espainiar estatuan ez dago halakorik, legea bera sexista delako. Emakumeentzako espetxeak izan arren, gizonentzako pentsatu eta diseinatu ziren lege eta egitura penitentziarioen pean daude. Horren ondorio garbia da emakumea espetxean ikusezina dela. Beti da azkena (espetxeko plangintza ekonomikoetan, inbertsioetan, kirol jarduera edo bestelakoetan).

Hala eta guztiz ere, kopuruan, gero eta handiagoa izan da emakumeen presentzia eta parte hartzea bai EPPKan, bai barne eztabaidetan. Horrek, eman al dio EPPKri genero perspektiba

osoago bat? Oztopoak oztopo, prozesu feminista bat garatu al da bere baitan? Galderak, Kolektiboa azken urteotan ezagutu duen preso ohi bati zuzendu diogu, eta hauxe da erantzuna:

> *Kontuan izan behar da EPPK oso dinamikoa dela, zoritxarrez, euskal herritarrak etenik gabe dira espetxeratuak, baina horren ondorioz, EPPK-ak haize berriak jasotzen ditu etengabe eta euskal jendartearen abiada berean egiten du aurrera orokorrean. Horretarako, gainera, EPPK-ko kideek esfortzu berezia egiten dute, batez ere barruan urte mordoa daramatenek. Hala ere, oraindik orain emakumezkoek % 10-15 izaten jarraitzen dute EPPK-an, baina hori kaleko egoeraren isla baino ez da. Gizarteak emakumeei egozten dien rola eta emakumeentzat gordetzen duen esparrua pasiboagoa da, EPPK-ko kide batekin lotzen dena baino. Hori hala izanik ere, ezker abertzaleak borroka feminista integraturik eta aktibaturik izateak ahalbidetzen du barne antolaketan, gutxienik, berdintasuna beti ikurra izatea, bai jokaeretan zein moduetan. Eta espetxean ere hala gertatzen da. Gainera, emakumeen kopuruak gora egiteak lagundu du emakumeenak soilik izan daitezkeen problematikak EPPK osoaren erronka gisa onartzera (amatasuna, isolamenduaren eta bakardadearen kontrako borroka -emakumeen kasuan gogorragoa dena-, etab.)*

Eskubideen urraketari dagokionez, espainiar zein frantziar estatuko jokabidea antzekoa izan da: Zapatero izan ala Sarkozy, prozesu demokratikoa garatzeko garaian, baina baita lehenago eta geroxeago ere, eskubiderik gabeko eremu bihurtu zituzten kartzelak, eta horrek ondorio oso larriak ekarri dizkio Kolektiboari.

Askatasun eskubidea bera ere legez ukatua zegoela ikusi berri dugu. Kode Penalaren aldaketa, Parot doktrinaren ezartzea edo Preben legearen tresnatzea emaniko atzerapausuak izan dira, baina eskubideen ukazioa ez da horretan geratu.



**Besteak beste, Nanterreko presondegian gose greban egon ziren, frantziar estatu jakobinoaren espetxe politika salatuz.**

2004. urtetik aurrera ugari izan dira frantziar estatuan euskal preso politikoek beren eskubideak edo, sarriago, beren burua defendatzeko egin behar izan ditutzen gose grebak. Julen Atxurra lekeitiarrak 46 egun egin zituen Rouen-go kartzelan, zigorra betetzen ari zen espetxetik maison d'arret batera inolako arrazoi edo azalpenik gabe lekualdatu eta bakartu ondoren. Dirudienez, Patrick Mollek, Frantziako Espetxe aferetarako zuzendaria, agindu zuen horrela jardutea Atxurrarekin, halako gertaerak tokian tokiko kapritxoak ez direla frogatuz.

Garai berekoa da Anjel Pikabeari pasarazitako gurutze-bidea. Izan ere, Moulins-eko presondegian egonik, helikopteroz ihesaldia saiatu izana leporatuta, Marsellara lehenago, eta Lyon eta Perpinyá-ra geroxeago eraman zuten. Bidean, gainera, jipoitu zuten. Honi guztiari erantzuteko, 42 egun eman zituen gose-greban hernaniarrak. Kasu gehiago egon dira, jakina, baina frantziar estatuaren inplikazio errepresiboa gorantza joan zen aipatu epealdian, Daniel Dergik, EPPKren mintzakideak, urte bereko abenduan salatzen zuen bezala:

> *Frantziar estatuan espetxe politika hain bortitza ez dela pentsa zitekeen, baina ez da egia. Jean Yves Groix militante bretoiaren suidizioa, Pello Mariñelarena edota Juan Jose Etxabe eta Jean Louis Maitiaren heriotzak gertatu eta gero, Oihane Errazkinen kasuarekin frantziarrak harro egon daitezke: beste koska bat daukate beren arma-ipurdian. Euskal militanteentzako kartzela parkearen zabaltzeak politika hiltzaile honen oinarriak uzten ditu begi-bistan, hau da, "euskaldun bat, presondegi bat".*

Espainiar estatuan, berriz, asko eta asko izan baziren ere eskubideen urraketak, Iñaki de Junaren kontrako jardute lerroa izan zen, nolabait esateko, bazterreko hautsa gehien harrotu zuena. Izan ere, euskal preso politiko honek 2006ko abuztuaren 7an ekin zion gose greba mugagabe bati bere askatasun eskubidea exijitzeko. Iñaki de Juana 2004ko urriaren 25 ezkeroztik libre beharko luke ezarritako 18 urteko zigorra bete ostean. Urte bereko urriaren 22an ordea Auzitegi Nazionaleko lehen salako magistratua den Gomez Bermudez-ek auto bat ebatzi zuen Iñakiren irteeraren kontra, urte hauetan bereganatu zituen erredentzio onurak ezeztatuz.

Justifikazio hau mantendu ezin zuenez, epaileak behin behineko kartzelaratzea agindu zuen talde armatuko kide izateagatik eta ustezko mehatxu terroristengatik. Azken agindu hau Gara egunkarira bidalitako bi iritzi artikulurekin lotu zuen. Azkenaldian, Gobernu espainarra eta salbuespen tribunal bat den Auzitegi Nazionalaren babespean, kanpaina bortitza abiatu zuten zigorra beteta duten preso politikoen kaleratzea ekiditeko. Horretarako ez dute lotsarik izan legeak sustengatzen diren oinarrizko printzipio guztiak urratzeko.

Lehen gose grebak 63 egun iraun zuen. Gose greba hau, De Juanak berak adierazi zuen familiak eta lagunek egindako eskaerengatik bukatu zuela.

2006ko urriaren 27an, tartean kalera atera gabe eta ETAren su-etena indarrean zegoenean, hasi zen Espainiako Auzitegi Nazionalak aipatutako mehatxuengatiko delituaren epaiketa.

Azaroaren 7an, aipatutako 12 urteko eta 7 hilabeteko kartzela-zigorra ezarri zioten. Aurreko egunean berriro ekin zion gose grebari, espetxealdia betea zeukanez aska zezaten aldarrikatzeko.




Ondoren, Auzitegi Nazionalaren aginduz, bere borondatearen aurka elikatu zuten De Juana, hiltzeko arriskua zela eta. 2007ko urtarrilaren 25ean, presoaren osasun larria zela medio, Auzitegi Nazionalak De Juanaren zigorraren egoera arintzea eztabaidatu zuen, baina 12 epaileren aurkako botoarekin eta soilik lauren aldekorekin, ez zen zigorra arindu. Auzitegi Nazionalak, AVTren eskaerari jarraituz, idatzitako liburuengatiko egile-eskubideak enbargatu zizkion. Bi egun geroago De Juanaren ama hil zen, urte bat eta erdiz pairaturiko zuen gaixotasun larria zela eta.

Otsailaren 5ean, gose greban 91 egun betetzen zituenean, The Times egunkari ingelesak elkarrizketa bat kaleratu zuen, ospitaleko argazki batzuekin batera. Bertan, Espainiako Gobernuari bake elkarrizketak berrabiatzeko eskaera luzatu zuen. Elkarrizketa honek hedapen handia izan zuen, eta hurrengo egunean, otsailaren 6an, *The Times*ek editoriala idatzi zuen gai honen inguruan. Otsailaren 8an Audientzia Nazionalak berriro ukatu zion De Juana kalera ateratzea, presoaren abokatuak eginiko errekurtso bati erantzunez. Otsailaren 12an Espainiako Epaitegi Gorenak bere zigorra 3 urtera jaitsi zuen, artikuluetan mehatxuak egiten zituela argudiatuz, baina ez **mehatxu terroristak.** Martxoaren 1ean, bere egoera larria zela eta, Espainiako Gobernuak bere Donostiako etxera bueltatzeko baimena eman zion azkenik. Egun horretan bertan, gose greba utziko zuela publikoki azaldu zuen presoak. Ekainaren 6an, ETAk su-etena amaitutzat jo eta hurrengo egunera, Iñaki de Juana Donostia Ospitaletik atera eta Madrilgo espetxe batera eraman zuten. Zapateroren gobernuak emandako hitza jan egin zuen beste behin ere.

Nolanahi ere, presoak ez askatzeko legediaren bihurriketa kapitulu berriak izan ditu geroztik ere. Sadismo hutsa batzuetan, soilik gorrototik uler daitekeen krudelkeriaz jokatu dute bestetan euskal preso politikoekin, eta oso bereziki hainbetekin. Hala, talde armatuko kide izatea egotzi zioten Unai Paroti 2007ko otsailean, delitua berriz egitea leporatuta. Sententziak *frogatutzat* eman zuen espetxetik ETAko zuzendaritzari eskutitz bat helarazi ziola Unaik, atentatzeko proposamen zehatzak egiteko. Horregatik 11 urteko zigor berria ezarri zioten. Parot 1990ean atxilotu zuten,

eta Auzitegi Gorenak euskal preso horrekin abiatu zuen gerora Parot doktrina gisa ezagutu dena. Alegia, erredentzioak aintzat ez hartzea, eta espetxe zigorra oso osorik bete behar izatea euskal presoek. Nahikoa ez, omen.




Frantziako epaitegiek, bere aldetik, presoak kaleratu bai, baina erabateko askatasuna eskuratzeko arazo asko eta asko ezarri ohi ditu. Gabi Mouescarekin aspaldi irekitako prozedura horietan, preso ohiak Euskal Herrian bizitzeko eskubidea ukatu eta Frantziako beste departamenduetan bizitzeko agindua jasotzen dute. Guztiz libre izateko mugapenak pairatu dituzten azken presoak Filipe Bidart eta Daniel Dergi izan dira. Lehenak, zazpi urte gehiago itxaron beharko du Baigorrira itzultzeko, Okzitaniako Beziers herrian konfinatuta baitago 2007ko otsailetik aurrera. Beste horrenbeste egin diote Daniel Dergi hazparnetarrari, hamabi urte preso eman ondoren espetxe zigorra ezarri zion epaileak Frantziako Estatuko hainbat departamendutan bizitzea galarazi dio-eta. Haute-Marne departamenduko Dizier herrian biziko da. Bergizarteratze zerbitzuek ezarriko dizkioten hitzorduetara joan beharko du, eta epaileari baimena eskatu beharko dio etxez edo lanez aldatzeko. Frantziako Estatutik irteteko ere epailearen baimena beharko du.

Ttotte Etxebeste burkide eta Filiperen lagunak zera esan zuen Bidarten kaleratzearen berri izatean: "Historiaren orrialde hori pasatzeko borondate politikoa behar da alde guztietatik eta ez naiz ziur benetan badagoen al ez. Gainera, borrokak hor jarraitzen du, hasi zeneko arrazoiak hor segitzen dutelako, hain zuzen. Hortaz, poza bai, jakina, baina ez erabatekoa".

## **Hegoafrika** *ez dago hain urrun*

Nelson Mandela kartzelan zegoela, zuri-beltzeko argazkiak egin eta munduan barrena zabaldu ziren. Erregimen arrazistaren basakeriaren irudi hedatuenak izan ziren, ordurako hogei bat urte baitzeraman preso Mandelak. Geurean, dagoeneko, 28 urte preso daramatzan gizasemerik badago: Jose Mari Sagardui Moja, Gatza goitizena duena. Zornotzako borrokalaria. Hogeitasei eta hogeita zazpi urte kartzelan daramatzatenak ere EPPKko kideak dira, Jon Bilbao Moro, Astrabuduakoa, eta Jon Agirre Agiriano, Aramaikoa, hurrenez hurren. Kartzelan urte gehien daramaten preso politikoak, Bigarren Munduko Gerra osteko Europa zaharreko marka guztiak apurtu dutenak, ez baitago beraiek beste urte jarraian kartzelan eman duenik.



***Sagardui, Agirre eta Bilbao, hil arteko espetxe politikaren bahituak.***

Jaenen giltzapetuta dute egun Gatza, baina preso daramatzan 28 urte luzeotan hamaika espetxetako errealitatea ezagutzeko parada izan du, gehienak ere Euskal Herritik kanpo. 1980an atxilotu zuten eta 1995etik kalean behar luke zornotzarrak, baina Estatu espainolak "gai honekin ere era arbitrario batean" betetzen dituela berak egindako legeak nabarmendu du. Aurtengo udazkenean hamahiru urte beteko ditu jarraian bakartuta, eta bere ahotsan antzematen da urteen joanak ez duela bere kemena ihartu:

> “ *Agerian dagoen lehen gauza da gure Herriak pairatzen duen errepresioaren ondorioz, Kolektiboak 700 preso baino gehiago dituela; ni atxilotu nindutenean, ez zen 130 kidera heltzen. Beste gauza bat nabarmen aldatu dena zigorraren urte kopurua da: duela 25 urte espetxean eman ahal zen gehienezko urte kopurua 30ekoa zen; egun 40ra heltzen da. Errepresioa era batera edo bestera handitu egin da. Gure eskubideak duela 25 urte zein gaur egun, berdin-berdin zapalduta daude: dispertsioa gero eta bortitzagoa da, preso gaixoak ez dituzte kaleratzen, hiru laurdenak bete ditugunok kartzelan gaude oraindik. Gure eskubide guztiak ukatzeko eta errepresioarekin jarraitzeko lehen Auzitegi Nazionala asmatu zuten bezala, gaur egun*

*Zaintzako Epaitegi bakarra asmatu dute, biak ere salbuespenerako entzutegiak. Espetxe barruko bizi-baldintzen egoera okerrera joan da, baina Kolektiboa bizi-bizirik dago, gure Euskal Herria bezala, eta aurrera jarraitzeko indarrarekin. Hori, besteak beste, gure senitartekoek ematen digute eta asko daukagu haiei eskertzeko. Eskertzekoa da gure alde hartu duten konpromisoa, gure itzala dira. Mementorik gogorrenetan ere, animoak eta irribarrea erakusten dizkigute. Hor daude beti.*

Bizitza erdia kartzelan, hamarkadak arrapaldan pasa eta, oraindik orain, euskal preso politikorik beteranoenak besteak hartzen ditu aintzakotzat bere egoera makurra deskribatzeko. Halako zumitzez saski sendoa egiten da, urteak joan urteak etorri, kartzelan. Izan ere, harro borrokatzeko eta duin eusteko behar beste motibo dugu. Gure Kolektibotasuna "nahigabekoa" dela esan dezakegu. Baina urrunago joan gabe esan behar dugu ohorezkoa ere badela EPPKren partaide izatea: Kolektiboko kidea izateak Euskal Herriaren aldeko borrokan jarraitzeko aukera paregabea eskaintzen digulako eta elkartasunean, maitasunean eta duintasunean oinarritzen den erresistentzia borroka baten kidetasuna eskaintzen digulako. Jesus Mari Zabartek baztutan gogora ekartzen digun bezalaxe: "Ama euskaldun eta abertzale bat dagoen bitartean izango da borroka honetan jarraituko duen norbait". Itzal handia eman duen zuhaitz baten adaxkak besterik ez baikara gu.

## **Euskal preso politikoak gara.** *Ez gehiago, ez gutxiago.*

Konbentzimendu honekin iritsi gara XXI, mendera. Sinetsitasun osoz. Geure *estatus politikoa* erreibindikatzerakoan, konstatazio bat ari gara egiten, alegia, izaera eta ezaugarri aldetik beste guztiak ez bezalako presoak gara, gatazka politikotik eratorritako militante presoak, eta gisa berean etsaiak behin eta berriro besteengandik bereizi eta zigortu dituzten euskal herritarrak gara. Estatus politikoa horren islapen praktikoa izateaz gainera, gatazkaren jatorri politikoa onartzea da, hori ukatzen duena konponbidea bera ere ukatzen ari delako. Horregatik da hain garrantzitsua, eta ez EPPKren nahikari hutsa.

Edozein modutan ere, badago estatus-a definitzeko ibilbide teoriko zein praktikoa. Adibidez, Jokin Urain Kixkur mendaroarrak halaxe deskribatzen zuen *Errotarria* (Susa, 2006) liburuan:

> *"1960ko hamarkadaren azken urteetako borroka da preso politikoaren estatusaren aldekoa. Inoiz urratsen bat aurrera egitea lortzen bazen -elizkizunetara joateko derrigortasuna kentzea esaterako-, horrekin batera presoen kontrola zorrozteko neurriak hartzen ziren. Espainiako Justizia ministroak duela hilabete batzuk esan zuen ez dela "pribilegiorik" ezarri behar preso politikoentzat "ezberdintasunak" baizik. Paradoxa bete-betekoa da, tratua berez berezia izaki, preso politiko estatusa helburu lortezina bilakatzen da.*



***Ezkerretik, Xabier Arnaiz, Gotzon Zabaleta eta Joxean Kortadi.***

2004ko udaberrian GARAK elkarrizketatu zituen hiru preso politiko ohik ibilbide praktikoan egin zuten indarra, prozesu politikoan Kolektiboak zer esana eta zer ekarria baduela gogoratuz. Xabier Arnaiz, Gotzon Zabaleta eta Joxean Kortadiren aburuan jendarte zabalaren beste bektore antolatua, aktiboa eta politikoki saiatua garenez gero, EPPKk subjektu bizia eta eginkorra behar du izan, derrigorrean, Euskal Herriko prozesu politikoan.

> “*Kolektiboak abiatzen hasia dagoen eztabaidan parte hartzeko apostu argia egin du. Begien bistakoa da 1998tik aurrera egiteko Herriak hartu behar duela eztabaida eta gogoeta sozialaren akuilua. Eta Kolektiboa, Herri honen alderdi bat den neurrian, hausnarketa horren partaidea izango da. Euskal Herritik urrun bahituta daukaten taldea izateak bertan gertatzen dena eta bertan bizitzen denetik at gaudela ez baitu esan nahi.*

Beraz, Euskal Preso Politikoen Kolektiboak aurrerapausu garrantzitsua eman zuen bere eskubideen bilduma osatuz eta *estatus politikoa*ren aldarria plazaratuz. Preso politikoen oinarrizko eskubideak biltzen dituen *estatus politikoa*k garai bateko eskubide politiko eta oinarrizkoen arteko eztabaida eta dikotomia gainditu eta preso politikoen aurka etsaiak darabilen jazarpenari aurre egiteko giltzarria bilakatuko da pixkanaka.

Halaxe, *estatus politikoa*ren aldarrikapena preso politikoen eskubideen defentsan dabilen jendarte sektore zabalentzat argipenerako baliagarria suerta daiteke. Gatazka politikoari bere sustraietatik heldu nahi dion inork ezin du preso politikoen oinarrizko eskubideen bandera hartu

eta, aldi berean, dagozkien eskubide politikoak ukatzea. Hau da, bere izaera eta gatazkaren izateari lotutakoak ukatuz. *Estatus politikoa*ren aldarrikapenak argipena eragin zuen euskal preso politikoek Euskal Herriaren aldeko eraikuntzan eta erabaki guneetan eduki beharreko presentzian. Eskubideen bilduma (edo *estatus politikoa*) EPPK Amnistia lortzerainoko bidean osatzen duen aktibo politikoa eta eragile papera bermatzeko tresna da. Hartara, *estatus politikoa*ren aitortza eta gatazka politikoaren existentziaren aitortza txanpon bereko aldeak besterik ez dira, presoak gatazkaren isla baitira.

Barrutik, halere, beste faktore batzuk hartu ziren kontuan 2001-2003 bitarteko barne eztabaidan EPPKk bere burua eragile bezala aurkezteko. Zer dela eta ondorio hau? Olatz Caminosek argibideak eskaintzen ditu jarraian:

> “*Garai hartan hasi zen Euskal Herrian eragile ezberdinen parte hartzea eta indarra bultzatzen gatazkaren konponbidean, eta norabide horretan, Kolektiboak argi azaldu zuen esateko asko zeukala, eta bere parte hartzea ezinbestekoa zela gatazkaren soluzioan. Horretarako, mintzakide berriak aukeratu ziren, Euskal Herriko sektore ezberdinen lankidetza bultzatu zen mintzakideekin, eta haien papera berzehaztu eta indartu zen, Kolektiboarentzat beharrezko ziren marra gorriak edo minimoak plazaratu ziren eta EPPK-k kohesioan eta indarrean asko irabazi zuen.*






***Anabel Egues, Juan Lorenzo Lasa, Argi Perurena eta Daniel Dergi, EPPk mintzakide talde berritua.***

2004ko Maiatzean Preso Politikoen Aldeko Nazioarteko Konferentzian Kolektiboak bere Mintzakidetzaren aurkezpena berritu eta berraktibazio publiko zein pribatuari ekin zion. Ordutik ez da gutxi Mintzakidetzak garatutako interlokuzioa, publikoki edukitako proiekzioa eta eginiko lana. Azpimarratzekoa da Nazio Eztabaidaren baitan Gatazkaren Konponbiderako Batzordean eginiko ekarpena. Edota Kolektiboak Oinarrizko Hitzarmen Demokratikoa beste eragileekin batera sinatu izana. Mintzakidetza osatzen duten kideak elkarrizketa ezberdinen bitartez komunikabideetan presente egon dira, etsaiaren mugapen eta boteretik gidaturiko hedabide gehienek gauzatzen duten boikot informatiboaren gainetik. Ez dugu ahantzi behar Kolektiboak eztabaida eta une

politiko garrantzitsuetan agirien bitartez ere bere iritzia plazaratu izan duela. Edota nazioarteko arloan Palestina, Txile, Turkia eta beste zenbait aberrietako preso politikoei helarazitako elkartasuna. Asko egin da, eta, batez ere, asko irabazi dugu, bai kohesioan, bai eraginkortasunean.

Espainiar eta frantziar gobernuei EPPKrekin hitz egiteko 2004an luzatu zitzaien gonbidapenak ez du fruiturik eman, baina 2005an Madrilgo gobernuak onartu zuen, inplizitoki bada ere, gure interlokuzio politikoa, *Txikierdi*-k aitortzen zuenez:

> *Orain urtebete pasata-edo, estatus politikoaren eta Euskal Herriratzearen alde egin genuen azken borrokaldi luzearen baitan, Estatu espainoleko espetxeetan gaituzten EPPKren bi mintzakideok espetxe administrazioari bilkura bat egiteko eskatu genion idatziz. Gure asmoa zen bilkura horretan Kolektiboaren aldarrikapen taula ofizialki eta zuzenki jakinaraztea Gobernu espainolari, eta harekin harreman bide politiko bat irekitzea Kolektiboarekin lotutako gaiak kudeatzeko. Espetxe administrazioaren goi kargu batek hartu gintuen bi mintzakideok eta estatus politikoarena mahai gaineratu genion. Tamalez, Gobernu espainolaren erantzuna gaurdaino errepresio bideari segida ematea izan da.*

Beraiekin ezin, eta gainerako eragile politikoekin ezin izango genukeela deliberatu omen zuten bi gobernuek, orduz geroztik mila oztopo jarri baitituzte interlokuzio politikoa burutzeko. Argi Perurenak eta Jose Lorenzo Lasak gogor salatzen zuten:

> *Bete eragileekin harremantzea dugu gainditu gabeko arazoetako bat, eta arazoa ez dugu mugatzen alderdiekiko harremanetara: eragile sindikal, sozial, kultural... ezberdinetara zabaltzen dugu. Kolektiboa aspaldiko etapa batean saiatu zen alderdi eta eragileekin bilkurak egiten. Haien erantzuna ez zen beti baiezkoa izan, baina horrela izan zenean Gobernu espainolak isolamendu politikoaren harresia altxatu zuen gure inguruan, eta bilkurak galarazi zituen. Geroztik, saioa egin denean eragileren batekin edo bestearekin -eta azkena ez hain aspaldi-, isolamendu politikoaren harresiarekin berriz egin dugu topo, jarraitzen baitu galarazten edozein eragile motarekin harremanak izan ditzagun. Gobernuak, horrela, biderkatzen ditu bere ahalegin errepresiboak Kolektiboaren erreferentzialitate politikoa amatatzeko. Dena den, Kolektiboak eragileekin biltzeko duen eskubidea aldarrikatzen du, eta dinamika hori abian jartzeko une eta abagune egokiaren bila dago.*

## **Prozesu demokratikoaren** *eklipsea*

Garatu gabe, baina 2005-2007 urteen bitartean ikustarazi zen prozesu demokratikoa bi zutaberen gainean eraiki zen: alderdi politikoen arteko mahaia, eta ETAren eta gobernu espainolaren arteko negoziazio politikoa. Bakoitzak bere dinamika zuen arren, elkar elikatzen zuten eta ezinbestekoak ziren prozesu demokratikoa eraikitzeko.

Egun, ezagunak dira porrotaren arrazoiak. Zenbait alderdiren aldetik, mahaiaren jatorrizko funtzioa desitxuratzeko, desbideratzeko eta akordio politikoak ez lortzeko ahalegin berezia egin zuten, eta gatazkari segida ematea hobetsi zuten. PSOEk eta PNVk ardura handia daukate egungo eszenatokian, baina eztabaida politikoaren heldutasunak ez du atzerabueltarik. Askatu beharreko korapiloak, metodologia eta negoziazioaren zutabe nagusiak zeintzuk diren sakon errotu dira, eta bide erdian aurkitu diren hainbat oztopo eta tentaldi betiko izen-galtzea nozitu dute. EPPK berriro erabiltzen saiatu izana, adibidez.

EPPK-k nola lagun dezakeen aurrerantzean korapilo horiek askatzeko orduan izan da, eta bada, luzatzen zaigun interpelazioa. Mintzakidetzatik argi hitz egin da horretaz:

“ *(...)Hasteko, jakinda saiatu direla eta saiatuko direla Kolektiboa erabiltzen prozesu demokratikoaren aurka presoak bakearen truke planteamenduarekin. Horretan tematuak daudenek, berriz ere jakin dezatela alferrik ari direla. Euskal Herriaren arazoa ez gara euskal preso politikoak, gu ondorio bat gara. Herri honetan autodeterminazio, lurraldetasun eta amnistiaren bidetik barneratzearekin bakarrik gaindituko da gatazka. Hortik abiatuta, eta gure eragiletza politikoaren izaeran oinarrituta, Euskal Herriko beste eragileekin truke politikoan eta prozesuan eragiten, eta gure ekarpena egiten, lagun dezakegu. Eguneroko borrokaz gain -hemen barruan eustea prozesu demokratikoaren aldeko eguneroko hogeita lau orduko borroka baita- gure indarrak jartzea eta zuzentzea prozesu demokratikoa indartzeko eta korapiloak askatzeko. Azken batean, prozesu demokratikoa ere borroka prozesu bat da.*

*(...) Lagun dezakegu gure Preso Politiko izaerari eutsiz, Herriaren askatasunaren aldeko konpromisoan gure engaiamendu politikoarekin jarraituz, eskuzabaltasunez eta herriarenganako maitasunez, orain artean bezala. Gobernuen erasoen aurrean etsi gabe. Gatazkaren oinarria zein den agerian utziz eta, gatazka politikoaren parte eta ondorio garen heinean, Kolektibo gisa ere gure hitza emanez.*



**Burgosen dauden hainbat kide. Tartean, Andoni Altza (gorriz eskumaldean), Parot legeak bahituriko oreretarra.**

Euskal Herriaren eskubideak urratuak direlako existitzen gara Kolektibo bezala. EPPK estatuen indarkeriaren emaitza da, ez besterik. Benetako arazoari eusten ez zaion bitartean preso jarraituko dugu, eta presondegitik, beti ere, gure kapital politikoa bideratuko gatazkari irtenbide demokratikoa bilatze aldera. Horretarako konpromiso osoa daukagunez borroka ekimen etengabeak burutu eta burutuko ditugu.

2007ko urtarrilaren 5eko planto orokorrarekin hasitako borrokaldia urratsez urrats bururaino eraman

genuen kartzeletan. Otsailaren 6tik 11ra bitartean itxialdia burutu ondoren, propaganda astearekin jarraipena eman genion. Jarraian komunikazio greba egin zuen Kolektiboak, eta orduz geroztik dinamika orokorrean txerta daitezkeen ekimenak. Atsedenik ez geurean. Prozesua amaitu zen, eta EPPKk ozen hartu zuen hitza:

> “*Gure borroka esparruari erreparatuz gero, bizi ditugun egoera zigortzaile eta neurri bereziak norabide eta helburu berdinean kokaturik daude, estrategia politiko-errepresibo orokorraren baitan, alegia. Bi gobernuek eusten diote gerra klabean oinarritutako espetxe politikari. Sakabanaketa bere horretan mantentzen dute, bakartze eta isolamendu neurriak areagotuz. Harekin batera salbuespenezko legeriari are indar handiagoa eman diote: bizitza osorako espetxe zigorraren aplikazioa, gaixotasun larri eta sendaezinak pairatzen dituzten kideen askatasunak sistematikoki ukatuz edo Iñaki de Juanaren kasua, isla adierazgarri eta lazgarriak dira zentzu horretan.*
> *Gobernu biak gure Kolektiboarekin jokatzen saiatzen ari dira, elementu desitxuratzaile bilakarazteko eta xantaiarako osagai moduan. Gure herriaren askapen borrokaren beste ataka inportanteetan bezala, borroka prozesuan eragin nahi dute presook maltzurki erabiliz eta bahitu politiko izaera indartuz. Nazio askapen mugimenduaren baitan etsipena eta pitzadurak sortzeko ahalegin zahar-berrituekin.*
> *Asmo hutsalean ari dira bi gobernuak, gure Kolektiboak aspaldian bereganatu zuelako beren jukutriak indargabetzeko behar beste heldutasun politiko, oso garesti ordainduta bada ere. Aurrerantzean badakite presoon aferari nondik eta nola heldu behar dioten, gu eratorriak garen gatazka politiko eta armatuari konponbide demokratikoa emango bazaio. Aurrerantzean ederki asko dakite zein den gatazkaren korapilo nagusia, eta nondik eta nola askatu behar duten. Bien bitartean, presook gure borroka tokiari helduko diogu. Ez diegu utziko gure burua euskal askapen borrokaren kaltetan erabiltzen, ezta urrik eman ere!*

Labur beharrez, indar horren zordunak gara. Ziurtasunak blindatu gaitu eta etsaiak espetxe frontean burura eramandako politika eta eraso guztien gainetik Kolektiboaren bateratasuna eta erresistentzia gailendu da urte luze hauetan.

Euskal Preso Politikoen Kolektiboa ezker abertzalearen gizatalde eta fronte kolpatuena izan da etsaiarentzat. Euskal askapen borroka desegitea helburu duen estrategian Kolektiboa xehatzea, Euskal Herritik eta borrokatik isolatzea eta barne zatiketa eragitea izan da tarteko xedea. Helburu horretan 30 urte eta gero etsaiak politikoki porrota besterik ez du ezagutu. Ia eskuko behatzekin konta ditzake urteetan zehar damuketa eta traizioaren bideari ekin dioten presoen kopurua. Beraz, politikoki Kolektiboaren garaipena ukaezina da. Borrokaren bitartez bere eskubideen defentsan jarraitzeaz gain, Kolektiboak, Euskal Herriaren askapen borrokari eta bere herriaren egoerari lotuta jarraitzea lortu du. Eta bahitutako burkideek herriaren babesa eta elkartasuna jasotzen jarraitzen dute egunero.

Liburua ezin dugu amaitutzat eman elkartasun horri bide emateagatik Auzitegi Nazionalak zigortu nahi dituen Amnistiaren aldeko Mugimenduko auzipetuak maitekiro agurtu gabe. Gutaz hainbeste idatzi ondoren, azken lerrokadak beren esku zabaltasunaren lurrinaz blaitu nahi du

lerrotara hurbildu den irakurlea. Herri honetan bere alderik hoberena nonbait islatuta ikusi nahi duenak, badu zeini begiratu. Badu ispilu gardena. Eskerrik asko, lagunak



# 3

## **EPPK: HERRI ASKEAREN ARRAGOA.** APALTASUNAK GUTXIETSIKO EZ DITUEN ONDORIOAK.



*"Txinako harresia*
*bukatu zen egunean*
*nora jo zuten harkinek?...*
*Hainbat historia,*
*hainbat galdera...."*

Zenbat eta zenbat istorio ez ote litekeen osatu azken hamarkadatan euskal preso politikoek espetxeetako harresi ilunetan idatzitako historia handian... Zenbat eta zenbat galdera sor dezakeen euskal iheslariek mundu zabalean bizi izaniko gorabehera eta mehatxu etengabeak harroturiko basamortu haizetsuan ihartu gabeko landarea bizirik mantentzearen abileziak...

Nola lortu duzu, ene lagun eta burkide hori, ezagutu eta maite ditudan aurpegi horien ispiluan ikusi edota anonimatoan ere anai arreba zaitudan hori, nola bada bihotza izoztu gabe itxaropenari leihoa zabalik mantentzearena urte luzeotan?



Ez dut aurkitu, zinez diotsut, liburukote marduletan eta adierazpen sasi letratu anpulosoetan zure arrimuan, zure akorduan, gogoa berotu didan indar parekorik. Zuen arnasaren taupada, lurrazpiko haziaren pare bihar etziko promesa bilakaturik bada ere, dopin sekretua izan dugu motxila bizkarreratu eta ibil egunari berrekiteko nagia astindu ahal izateko.

Lau letrok juntaturik bidelagun izan dugun indar horren oihartzun xumea lau haizetara igorri eta horrela zuenganatzeko aukera hau profitatu nahiko nuke, lagun zaharren arteko nola halako elkartze orok piztu ohi duen poztasun ximela behialako kontakizun eta pasadizoz bete ordez, gero askearen aldeko hitzartze ameslari eta borrokalaria izan dadin.

Sakabanaketa, urruntzea, erbesteratzea edota sasiak ezarritako isilpekotasun ororen gainetik, gure herriaren ahalegin eta bizipozaren berri helarazten duen hari xume, ahul hori ez da eten. Asmak jokatako ibiltari egoskorrena izatea inork kenduko ez dion *Che* Guevara maitagarriaren antzera, hortxe dabil euskaldunon borroka matxino xumea ere bertoko eta kanpoko mendi hegaletan.

Garaipenaren eskuratzeak senda ditzake borrokaren hamaika zauri, sekulan ez bihotzean iltzekaturik dugun burkide haren galera edota etxeko seme-alaba maitatuenaren faltak goizero berpizten digun hutsunea. Horren ezean, aurrekoen akorduan, ezinean ito ziren arbasoen borrokaldietan epikaren oihartzun bidelagunik topatzeko badugu abilidade frankorik gure artean.



Irekitako zaurian, borroka garaian, zail xamarra dugu, berriz, minak eragindako malkoen arragoan Euskal Herriko zeru gainean pizturiko izar berrien dir-dir keinukariari jaramon egitea. Baina bizitza askearekin lot gaitzakeen aire fresko hari bakarra gureganatzeko aukera (gaueko zohardiaren) isilpeko ahaleginetan marraztea baino ez dugu izan Euskal Herrian.

Egunsentiaren atarian sentitu ohi den neke itxaropentsua arnastuko duzulakoan nago. Bidea inoiz ez baita eroso izan eta aurrerantzean ere korapiloz beteriko sokak lotuko gaitu hamaikagarren lainoek irudikatu baino uzten ez digun askatasunaren gailur iheskorrari.

Euskal Herriak egun bizi duen une politiko erabakiorrean lorpen esanguratsuak eta erronka berri eta latzak elkarrekiko lehian ari dira josten, etorkizunerako bidea txirikorda bilakatuaz. Izen, gune eta ekarpen famatuen ilajea gerta daiteke protagonista irudiaren morrontza eguneroko ogia dugun garaiotan.

Milaka gizon emakume ezezagunen ahalegin egunoroko eta apalen multzoak trinkotu du, ordea, urrats berriotan norabidea bermatzea eta moketaz jantziriko amildegietan ez jausteko ainguratzea eskainiko digun lokarri sendoa.

Izan ere, lorpen esanguratsu horietan EPPK osatu duten gizon eta emakumeen ekarpenak izan duen garrantziaren jabe bilakatzea izango dugu datozen urteotako euskal nazio askapen mugimenduak aurre egin beharko dien erronka horiei tajuzko erantzunik zirriborratzen hasteko aukeraren oinarrietako bat, oinarri nagusietako bat.

Nabarmenkeria oro erro errotik errefusatu duen kolektiboa dugu euskal errepresaliatu politiko guztiek osatzen dutena. Herri honen berregite, berreraikitze, berrizate eta berradierazteari begira sekulako ekarpena izan da, bada, eta izango da izotzaldi orotiko itzultzeko gaitasuna frogatu duen lagun talde horrena, abentura honetako tribuen arteko talderik taldeena, barreiaturik barreiatuena izan arren.

Euskal Herri independiente, sozialista, euskalduna eta ezpatriarkalaren aldeko hautuan, herri askea eraikitze bideari zein gizon emakume aske bilakatzeari ekin dion indarraren adierazle iraunkorra izan dugu estatu zapaltzaileen jomugaren erdi-erdian bizi den errepresaliatuen kolektiboa.

Atzoko eta gaurko askatasunaren aldeko aldarrien artean ez dago etenik. Kate begi ahulena izango zelakoan, estatuen estrategiak errepresaliatuen kolektiboaren kontrako zigor operazio erraldoi eta koordinatuari ekin zion aspaldian. Kate begi sendoenetakoa izan da, ordea, kartzelan, deportazioan edota sasian bizi beharra nozitu duten errepresaliatu eta iheslarien kolektiboa. Harri bitxia, zinez ederra. Baina hamaika sufrikarioaren arragoan ondutako harri bitxia. Minaren oihartzuna dakarkiguna bere izpi dirdiratsu bakoitzean. Nazio askapen mugimendu osoarena ez ezik, Herri oso baten mina ere badena. Erditze minaren antzera, zauri guztien gainetik, erditik, bere baitan bizi sormena dakarren Euskal Herriaren berreraikitzearen iturri oparoa bilakatu den mina. Askatasunaren eskuratzeak soilik sendatuko duena.

Eta bitartean hil ala biziko kontua dugu geroaren ardura guztion artean berbanatzea, denok eman dezagun zerbait batzuk dena eman behar ez izateko. Herri honen askatasunezko geroari begira dugun aktiborik garrantzitsuenean galera berririk izan ez dadin.

## EPPKren EKARPENAK: DAGOENEKO IRABAZITAKOAK

### **Hamaika urrats txikitan** *gauzaturiko garaipen eskerga*

Garaipenaren bila etorri den gerra estrategia ororen amildegia bilakatu da EPPK-ren erresistentzia gaitasuna. Oinarri izateak eskatzen duen egonkortasun eta egoskortasunaren jabe izan da kolektiboa. Eta hori estatuak sortu eta kopiatutako kartzela eta errepresio eredu guztiei aurre eginez.



Biharamonean bertan sistemaren estolderiaren ahoa den espetxeak bere irenste etengabeari berrekin zion, 1977ko borrokaldi haiei esker eskuratu kaleratze orokorra konponbide politiko eta demokratikoaren ataria bilaka ez zedin erakarri zuen saldukeria dela medio. Frankismoak utzitako herentzia estuki loturiko eredua, txikizio eredu primitiboa izenda dezakeguna, izan zen gurutze bide honen lehenengo urratsa. Txikizio eredua, txakurren etengabeko zaunkak barnera arazi nahi zuen menpekotasunarena, ezereztatze politiko doilorra, Soria.

Urruntzearen gerra-baloreaz jabeturik, zenbait urrats zehatz jada emanik zirela *(Alcala, Puerto,...)* PSOEren eskutik etorri zen berrikuntza. ZEN planaren aterkiaren babespean, esterminio eremuez jakinduriaren hiriburua izatearen merituak ederki frogaturik zituen alemaniar estatuaren eta Mossad-en ekarpenak sintetizatu nahi zituen eredu modernoagoa. Nahita ere ahantzi ezina, betiko izen propioaz gogoratu beharreko amets gaiztoa ezagutu genuen euskaldunok: Herrera de la Mancha.
Errepresio zientifiko eta sistematikoenaren mailukadak ezin izan zuen EPPKren oinarri den duin-

tasunaren sendotasuna hautsi. Pitzadurak eta zauriak begi bistakoak izan arren, borrokaldi gotor eta elkartasun uholde koloretsuari esker, askatasuna amets, borrokatzearen balioak loratze ederra ezagutu zuen eremu latz hartan.

Bertoko zuraz eginiko ezpalaren zauria beharko luke enborraren haustura ekarri, beraz. Eta hortxe agertu zen jakinduri jeltzalea espainiar monarkiari bere zerbitzu ezin leialagorik eskaintzeko. Oraingoan ere, Ertzaintzaren prestatze eta osaketan bezalaxe, ahoskeran ez ezik jokabidean ere sionisten zaleena agertzen zen ministro eta kolpisten lagun sozialdemokrataren arrimuan.

Aurreko orrietan irakurri duzuen bezala, sakabanaketa sistematikoari ekin zioten, banakako joko arauetan askapen mugimenduaren zutabe irmo izaniko kolektibo hori zutabe izateari ez ezik kolektibo izateari ere uko egingo ziolakoan. Lagunen arteko ozpina eta pozoia sartzeari lanketa zientifikoa erantsi zioten horretarako. Egurrari azenario kolorea ere erantsiaz, itxuraz bestelakoa agertu ohi zen arren, errusiar erruleta baino psikologoen behaketan eta sare jeltzalearen informazioan oinarritutako "hautaketa" sistema osatu zutela. Sari pozoituak eskainiaz, elkarrekiko leialtasuna hautsiko nahi zuen tortura sistema zuria izan zen 1989an abiaturikoa.



Dispertsioa, aldiz, ez zen emankorra. Duintasun eta euskortasun indar erraldoi bat ageri zen patio ilun haietatik. Literaturatik askoz haratago, pentsa zitekeen zeru txiki horiek are murritzago bilakatu nahi zituzten burdin-harizko sare horien bidez kide bakoitzaren erresistentzi eta borrokaldi txiki bakoitza kolektiboaren borroka taupada ozenean saretzen zirela.

Elkarrekiko errespetuan, bestearen ahuleziarekiko begirunean, borrokaldi bakoitza norberaren neurrian baino urrutiko eta biharko kideen arabera jokatzeko borondate irmoan oinarriturik... Dispertsioaren azken gutizia, espetxe bakoitzeko barne sakabanaketa eta isolatze-bakartze ildoak jaurtiriko misila indargabetu zuen espazio sarea horrelaxe eraiki zen.

Sakabanaketa-isolamendua, deabruaren bikotea, barne gogoaren haustura eta ezintasuna bilatzen zuen, militantea izan

eta sentitzeko. *Dispertsioa 2* izeneko filme beldurgarria. Ez zuten kontatu sustrai sakona duen pagoaren sendotasunak, iharturik ere, pagadian eder eta kide egiten duela. Horretan egin zuten huts. Horretan eta euskaldunon artean apustutarako dagoen sen ia oromenderatzailea ahanztean, ezetz! dioskunari nola hala aurre egiteko indar nafarra piztu ohi diguna.

Egungo eredua, guraso zital guzti horien seme-alabarik zuriena da. Zentzugabekeria lege bilakatu duena. Lorpen politikorik eskuratzeko inolako itxaropenik izan gabe ere, bere horretan mantendu edota mikroprozesadorea bailitzan etengabe zehaztu eta berbideratzen duen sistema da egungo sakabanaketarena. "Txikikeria" bakoitzean txikizioa bilatzen duena. Presoen aurkakoa ez ezik ingurukoen aurkako mendekua.

Beren amore emate itxaropenik gabe, "erredentziorik" eskaini eta bilatzen ez dabilena. Sekulan huts egingo ez duen borreroari, denborari berari alegia, aukera luzatzen dion eredu ezin demozuriagoa. Egunsenti bakoitza zama bilakatuta, egunerokotasun hutsalak bere eragite ustelaz preso bakoitzaren bihotza ez ezik burmuina ere izoztea bilatzen duena.

Egunerokotasuna egunez eguneko berdinkeriaren baitan itxaropen eza edo unez uneko gorabehera pertsonal edo politiko bakoitzaren arabera larritze efektua sortu nahian ari dira etengabe. Horretarako komunikazioa murriztu eta urtetan osaturiko elkartasun sarea desitxuratzea bilatzen ditu 10 lagunen mugatze ziztrinak. Telefono dei bakoitzak 5 minutuko iraupen mekanikoak komunikazioaren desitxuratzea bilatzen du, ordenadorez, makinaren hotzaz, bokien ganora ezak inolako zirrikiturik ireki ez dezan.

Maitasun izena zinez merezi duen pinpilinpauxak bere hegal ameslariez egositako bikote harremanak hausteko jokabide zitala ere hortxe dago, tarteka ezkontze agirien exijentzia ere eranskin doikorra tarteko. Amatasun eskubidearen aurkako eraso etengabea, gartzelan ere emakumeen aurkako zigor erantsi anitzen beste erakusgarria da.

Ikasteko aukerak, euskaraz bizitzeko eskubidea, barnetik hazten edo euskal herritar askearen izate grina birsor dezakeen edozein ekimenen jazarpen politiko errepresiboa ere bere dantza makabroa eskaintzera dator noiznahi, harresiaren barrutik bertatik ezina amaraunatuaz edota Euskal Herriko edozein unibertsitate eremu edo irakasle mediatikoki fusilatuaz.

Kartzelaldia denboraren aurkako borroka huts eta hustutzaile bilakatu nahi duen nano-estrategia dei dezakegu hau, zainetan itsatsi nahi digutena, han eta hemen, barruan eta kanpoan. EPPK osatzen duten gizon emakumeen bizi izpi bakoitzaren mozketa sistematikoa dela medio, euskal nazio askapen mugimenduarentzat denbora aurkako faktore politiko garrantzitsuena bilakatzeko apustua.

Irentsi nahi zuen ehiza txikitu ezinak pizturiko amorruaren eraginez, itsuturik darraio bere eraso itsuari, kolpeka batetik bestera, dispertsioaren herensugeak. Itxurakeriaren neurri orori bizkar emanik, espainiar edo frantziar estatuek beren legedian bertan kabitzen den (giza)legezko edo-

zein arauren errespètatze hutsari porrot politiko erabatekoaren zama erantsi diotelarik.

## **Ezker abertzalearen proiektu askatzailearen osotasuna, integraltasuna,** *kartzeletako arragoan ondutako altzairuzko aleazioa.*

Hitz ponpoxo askoren errepikapen hutsa bilakatu da askoren ezkertiartasun gorri bizikoa. Ezker abertzalearen ibilbide luzean, mito zaharkitu edota Berlingo harresiaren beraren erorketak ez gaitu inolako hirugarren bidetan edo nihilismo posmordenotako noraezean zorabiatu.

Harresiaren bestaldeko biztanleek Euskal Herria eta euskal herritarren aurkako menperatze sistemarekiko aurkakotasuna haragi bizian zuten bizi, egunero, ordu oro. Eta hortxe, hitzetatik sustrairago, bere baitan txikia den ahalegin etengabea erraldoiaren indarraz janzten da. Ziega baten hormak ispilu bakarra duen gardentasun erraldoi horren iraultzailetasuna da garaile, beti. Bere balioa ez baitatza berehalako emaitzetan.

Borroka iraultzailearen lur hartzea izan da, beraz, EPPKren ekarpen erabakigarrienetarikoa. Nahiko genukeen hartatik, egungo baldintza errealetan, gune zehatzean bizi dugun une zehatzaren baitan formulatzen den ekimen zehatzaren arabera pizturiko borroka bilakatzen da hautu sortzaile bakarra. Dagoenaren arabera, ez.  Ezta kalkulu "zientifikoen" baitan ere. Are gutxiago norberaren mugak edo ezinak literatura politikoaz jantziz. Ibilbide horrek soka motza du-eta espetxe bateko patioaren mugetan barna. Are motzagoa, isolamendukoa bada.

Ahalegin eta borrokaldi bakoitzaren garrantzi estrategikoaz jabetzeko unibertsitatea bilakatu zaigu espetxea, beraz. Aldaketa txiki bakoitzaren garrantzia erabakiorra izaki, etengabeko erne ibiltze hori, etengabeko ahalegina, ekinez osaturikoa, bilakatzen da edozein hauturen sostengu estrategiko nagusia.

Berehalako emaitzetatik apartatu eta bide luzearen arabera inbertsio bakoitzaren errentagarritasuna neurtzen duen ikuspegi erabat antikapitalista da makoetan gorpuzturikoa, pinudiaren diktadurari uko eta pagoaren zikloaren ikuspegia barneratzen ikastera eraman gaitzakeena.

Borroka molde eta maila guztien integrazioan oinarritzen den izaera trinko bezain koloretsua da Kolektiboarena. Izaera bateratua, altzairua bezain trinkoa den ukabilaren unean. Piano jole baten eskua bezain dantzaria, mugikorra, barne eztabaida, zirrikitua ireki bezain laster, pizten den guztietan.
Oreka dinamiko hori osatzeko gai izan den EPPK-ren ahalmen politikoak konfidantza eta umiltasuna

ditu iturri oparoak. Behin baino gehiagotan itsuan behar izan bada ere, norberaren eremu edo lubakiaren defentsaren garrantzi estrategikoa erabat barneratuta, urruti diren lagun guztiek osaturiko indar edo trinkotasunaren jabe izatea ahalbideratzen duen batasuna da horrela osaturikoa. Altzairuzkoa. Herdoilgaitza.

## **EPPK.** *Ispilua, amets indar sortzailea eta gure iragazki etiko-politikoa*

Ispilu horretan begiratuta, borroka premiei aurrez aurre begiratzeko gardentasuna, unean uneko mugen aitortza leiala, kolperako erabakiortasuna eta erresistentziaren duintasuna funtsezko balore politikoak direla ikasteko parada izan du ezker abertzaleak, bere osotasunean. Askapen mugimendu baten barnean gako nagusiak onda luzekoak baitira, inolako duda izpirik gabe.
Berehalako errentagarritasun kalkuluen gainetik pentsatu eta erabakitzeko gaitasun sakabanatu




baina bateratu horren bidez, senda belarrez beteriko larrea osatu du EPPK-k. Diskurtsokeria edo saldukeria ororen aurkako alarma sistema ere bilakatu zaigu patioetako lagunen arteko elkarrizketek gorpuzturiko ahotsa.

Hitzez osaturiko egitasmo politikoaren mugak agerian jarriz, gure gabezia edo kontraesanen igarlea izan da gehienetan espetxeetatik heltzen diren hausnarketa patxadatsuak, kanpoan izan ohi dugun koiunturaren araberako asaldatze iraunkorraren eragina orekatzen lagundu ohi diguna.

Burdinaren kolpe hotzarekin lotu ohi den abilezia da hori baina aitzurraren kirtenari gogotik helduta sortzen den izerdi beroak olioztaturiko oldartze eta jokabide matxino orokorra da sekretua.

Izan ere Euskal Herriak osatu duen desobedientzia (zibila) esperientziarik sakon eta handiena da harresietako mugen barnean zein munduko lurralde ezin aldenduagotan egositakoa. Borroka premia eta borroka bera panpin jolasa bilakatu edo desagertarazi nahi duen aldarrikapen teorizista eta "guay" askoren kaltean, ekimen erraldoia burutu da, burutzen ari da, espetxez espetxe, sasian edo erbesteko zulo umiletan, azken hogeita hamar urteotan.

## EPPKren EKARPENAK INDARREAN DARRAI, MAKOETAKO ZIEGA GRISETATIK OPARI KOLORETSURIK IGORRIAZ

Zama izatera kondenatu nahi dute estatuek baina horixe izan da eta izango da euskal preso politikoek sekulan bete beharko ez duten kondena. Sufrikarioz osaturiko kateaz loturik dituzten arren, arrastaka eraman beharreko pisu astuna izateari aspaldian egin zioten iskin, ihes, EPPK osatzen duten gizon emakumeek. Oraingoan ere, garai berrien aldeko indar sortzailea bilakatzeko etengabeko ahaleginean ari da. Une erabakigarrienetan egin duen bezalaxe. Askotan, gehienetan, kartzeletako lubakian bereak eta bost bereganatuaz. Baita bereak beharko ez lituzkeenak ere.

Une honetan EPPK bere izate kolektibo eta politikoaz aitortza eskuratzeko bidean urrats sendo eta emankorra burutzen ari da. Sufrikarioa *lei motiv* bakarra duen estrategia ukatzaile eta zatit-



zailearen gaindi, Euskal Herriaren aitortzari eta euskal hitzaren osatzeari bidea eginez. Bada izan presoen sufrikarioaren erabilera burutzen ari dena, aitortze hori eta hitzaren berrosatze eta berreskuratze bideari traba jartzeko. Aita edo amaren ezpainetatik tarteka eroritako aienea, sukaldeko bakardadean edota ostiraleroko enkartelatzean isuritako malko iheskorra lapurtu nahi duenik ere bada une honetan, horren bidez bere hautu politikoak harresien bestaldean jaso duen zaplastakoa mendekatu nahian edo. Zauri min horiek inola ere ezin daitezke eztabaidarako munizioan bihurtu. Lagunen sufrikarioaz trafikatzen duenaren patxikeria oro dira okagarri bezain gorrotagarriak.



Presoen erabilera politiko interesatu honek, panpin edo txotxongiloen antzera hariak mugitu nahi dituenaren mamu beltz batek presoen izenaz eta izanaz jabe denaren gezurra lantzeari ekin dio urtetan. Formatu jeltzale klasikoari hurbilagoko eredu eraberrituak *(Aralar mendilerroaren izen ederra itsustea meritu bakarra duten horiek)* protagonismoa kendu nahi diolarik. Aberats berrien antzera, aurrekoen marka guztian hausteraino. Noraino eta azkenean euskal preso politikoei kolektibo izatea bera ukatu eta eragite politikoa izateko eskubidea bera ere ukatzeraino. Eta hori guztia beraien defentsan, jakina.

Truke txanponarena finkatzea da interesatu ohi zaien bakarra halako politikero jakintsuei. Euskal preso politikoen egoera halako edo bestelako koiunturari atxikitzea, egungo egoera, eskubideen urraketa larria, finean, borrokari atxikitzen dionaren erantzukizuntzat aurkeztuaz.

Oso bestelako bideari ekin dio urtetan EPPK edota iheslarien kolektiboa. EPPK bere autoafirmazioa, bere autoeraketa, bere autoadieraztea landu du etengabe. Eta borrokaz jositako ahalegin horren baitan, baita bere buruaren aitortza eskuratu ere.

Euskal Herrian askatze bidea marraztu behar duen prozesu politikoaren sustrai berari eragiten dioten kontuak, hain zuzen. Euskal Herriaren autoafirmazioa, autoeraketa eta autoadierazte zereginak ditugu abiatuak, Euskal Herriaren eta bere hitz askearen aitortza eskuratze bidean.

EPPKren bide propio horren isla prozesu politiko orokorrean ere ematea dugu kontua. Txertaturik eta elkar txirikordaturik daude eta.

Hori oztopatzera dator, funtsean, egungo sakabanaketa politikak. EPPKren ekarpen kualifikatu eta kualitatiboaren eraginkortasuna mugatzera. Eta horrexegatik garai berrien aldarrikapena egunero erabili ohi dutenek ere euskal preso politikoek pairatzen duten politika kriminalaren aurrean mutuarena baino ez dakite egiten.



***Arrokek itsasoa zedarritzen ez duten bezala, kartzelako harresiek ez dute geldiarazten Kolektiboaren bultzada.***

Dispertsioak bere horretan irauten du, etsipena bilatuaz. Euskal Presoak Euskal Herrira! aldarrikatzen jarraitu beharra inposaturik, konponbide demokratiko eta bidezko batetarako urrats minimoena ere ukatzen digun harresi berri baten aurrean kokatu nahi gaituztelarik, espainiar eta frantziar estatuen kartzela harresi guztiek osaturikoa. Isolamenduan den euskal preso politiko batek bere eskubide eta duintasunaren defentsan borrokatzeko premian dagoen bakoitzean sortu ohi den amildegi beraren aurrean kokaturik gaude. Sekulako prezioa pagatu beharko erabat desorekatua den lehiari ekin beharra datorkigu gainera, eskubide zinez oinarrizkoenak eskuratu ahal izateko edo bederen bagarela agertzeko. Erronkari heldu beharko, beraz.

Gatazka errotik konpontzeko borondateak prozesu demokratiko bati atea irekitzea baino ez dakar berarekin. Une honetan hain da bidezkoa eskaturikoa, eta hain da oinarrizkoa. Itxaropena bera ere galdu beharko ote? Ala, beste aldetik jasotzen dugun erantzun doilor eta koldarra ikusirik, amaierarik gabeko bide luze eta mingarria baino ez dugu izango aukera gisa?

Dikotomia faltsu etsipenezko honi aurre egiteko bide bakarra borrokarena da, egungo ezina bihar etziko egina bilakatzeko indar biderkatzailea den borroka sortzailea. EPPK ez da izango parte bide horretatik apartatu eta esertzeko besaulkirik bilatzeko hautuan, edonola jantzita agertuko denik ere. Egungo ideologia, arrakastaren ideologia, mendiaren ederra gailurrean soilik ikusten duenari eman ohi dio ospe eta aitortzarik. Horrek, aldez aurretiko bermerik gabeko egoera ororen aurrean, hamaika aitzakia aurkituko du bideari ez ekiteko. Nekez aterako da bidera, alferrikako nekearen geruzan onuren kalkuluak estalita, bere izen ona nolabait babesturik.

Bidean abiatu zenak, ordea, nekearen nekeaz bada ere, pausu luzatu ezinean ibilita sarri, eserita geratu zen hark galdutako edertasuna dastatzen aldapan bertan asmatu eta beti gorago agertu ohi den askatasunaren gailurrerako bideari eutsiko dio.

## Denboraren kontrola,

*konpondu beharra baino konponbide zinez demokratikoaren ezinbestekotasuna*

Gatazka gainditzea ez baita ezarritako sufrikarioek eragindakoak piztu digun premia, urratsez urrats ibilitako bideak ireki dizkigun aukeren garapenaren aldeko hautu eta erabaki sendoa baizik. Horrexegatik gatazka gainditze bide bakarra konponbide demokratikoarena da, bake bidezko eta iraunkorra ekar dezakeen gero aske eta irekiaren jokalekua.

Ez gara ari, beraz, nola halako amaieraz. Geroa ere badagokio Kolektiboari, geroari Kolektiboa bera kontutan izan eta bere aitortza eta erreparazioa dagokion, dagokigun, bezala. Ez dago ezeren amaierarik, irekitako bideari jarraitzeko determinazioa eta beti hurrengo aurrera pausuari begira bizitzea dira izatekotan bihar etzikoari begirako talaiak.

Ilusio eta une itxaropenezkoak indartzen ari direlarik, ziega ilunetatik edota urruti bizi behar inposatutik pausu sendoz eta ikusmira zabalaz ibili beharra datorkigu bidai gidari. Luzatutako esku irekia ez da eskalearena. Inor tronpatu ez dadin, EPPK ez da lastertasun presiorik sortuko. Txantaiarako edo truke txanpon gisa errepresaliatuak erabili nahi duen orok gogoratu beharko duen kontua da hau. Izan ere esku horrek ukabilaren memoria ederki gordeta baitu, baten batek frogarik nahi izanez gero.



Biharko erronkei begirako oinarri sendoa osatzeaz ari gara eta horri begira ari da EPPK ere. Norberaren neurrira ezin behartu diren prozesuak dira esku artean ditugunak. Norbera ez da parametrorik egokiena. Kolektibotasuna eta oroimena bidai lagun ezinbestekoak dira.

Denboraren kontrola, perspektiba historikoaren balioa, premia, ageri agerian dira, aurrera egingo badugu. Isilpeko ahots askoren oihartzuna bilakatzen da horretarako EPPK. Eta bere eragitea erabakiorra izango da emaitzak neurtzeko parametro nagusia lortutakoa baino, aurrera jarraitzeko energia berria izan dadila.

Kartzela ez da denboraren kontrako borroka gune bat. Kartzelaldia noiz bukatuko den begira egote, iraute hutsa ez den bezalaxe. Gero askearen eraikuntzan derrigorrezko lubakia da, sarri bakardadean borrokatu beharra berarekin bat dakarrena baina borrokan diharduenak esan dezake halakorik: "etsaiak ez du sekulan ulertu ahal izanen zein lagunduta egon naizen mitardeko bakardadean eta...."

Errotiko konponbidea da osatu beharrekoa, eraiki beharrekoa, adostu beharrekoa. Apustu horretan buru belarri ari garelarik, EPPKren eta errepresaliatu politiko guztien ekarpen historikoek beren egiazko dimentsio politikoa hartzen dute. Horren arabera duten garrantziaz jabetu ahal izango gara!

Une politiko honetako gako nagusia osatzen duten faktoreetan eraginez, Euskal Herriaren aldeko indar sortzaile etengabea da errepresaliatuen kolektiboa. Une honetan, azken urteotako norabideari jarraiki, askatu behar dugun korapiloa askatzeko gai bilakatu gaituzten urrats funtsezkoenetan ez da espetxe, deportazio edo erbestetik igorritako bultzada faltako.

## **Euskal Herria izan bada munduan,** *borrokan diharduelako*

Une politiko honetako gakoa laburbiltzen den hirukotea dugu hau: EUSKAL HERRIAREN AITORTZA. Izan baden herria, ukatua, zatikatua, azpiratua baina bere gero askerako zirrikituaren jabe bilakatu dena, urte luzetako borroka eta ahalegin ugariei esker.

Euskal preso politikoek zein errefuxiatu, deportatu eta errepresaliatuek osatzen duten kolektiboa Euskal Herriaren enbaxadore etengabea izan da. Bere lekukotasuna eraginkorra bilakatu da hamaika parajetan. Euskal Herriaren Mapa marraztu du bizi beharra suertaturiko eremu guztietan. Eta ispilu honetan islaturik berebiziko indarra hartu du gure Herriaren herri izate horrek.

Euskal herritartasun horren aitortzarik ere irabazia du hainbatetan. Nabarmena da hori kartzeletako patioetan. Egoera gordinetan ere, beste presoekiko harreman elkartasunezko eta duintasunezko eredugarriak landuta, euskal izate horren izen ona eskuratuta. Baita argazkiaren negatiboaren arabera, alegia, kartzeleroen aurrean eskuratutakoa, kasu honetan euskalduntasunaren aitortza garesti pagatzen bada ere.

Gatazkaren izaera politikoa azaldu, erakutsi, frogatu egin dute, egun eta uneoro, errepresaliatu politikoek. Espetxeetan sartze unetik bertatik landu beharreko bezain irabazitakoa. Espetxeetako morroien zabarkeriak aitortza horri preso bakoitzaren fitxan edota zerrendetan norberaren izenaren ondoan ETA idaztearen moldea eman dion arren. Deportazioan edo erbestean euskal nazio askapen borrokaren balioak ezin gardenkiago ulertu ahal izan dute Uruguayn, Cabo Verden eta beste hamaika lekutan.

## **Euskal Herria berrosatuaz doa,** *eragile nazionalak sortu*

Bide horretan kolektiboa izan zen lehenengoa urrats erabakior hori bideratu eta nazio mailako batasuna modu finkoan bereganatzeko. Sigla eta maila desberdinen arteko batasuna, aniztasun handiko batasuna, kontraesan eta muga askoren gainetikoa. Baita mendetan inposaturiko estatuen arteko muga faltsua pitzatzekoa ere. Kolektibo bakarra osatuaz jauzi aintzindaria eman zuen EPPKk. Bere barne aniztasunari leku eginez, euskal preso politiko guztiei irekia izanik, izate nazionala eskuratzeko egokieraren jabe bilakatu zen.

Funtsezkoenaren inguruko indarrak metatzearen premia aintzat harturik, aniztasunaren balorea, apaingarri hutsal gisa jantzi baino, egiaz eta zintzotasunez bereganatu bere egin du EPPKk.

Batera jokatzearen garrantzi erabakiorra, hil ala bizikoa, begi bistan baitago ziegarik ilunenean ere. Halere ez dago inolako merkataritza jokorik horretarako, nola halako kontsentsu baten bila.

Eskubideen aldarria eta eskubideen defentsa da guztion bat egitea ahalbideratu eta ezinbesteko egiten duena. Izate politikoari eutsita, izate politiko horren adierazpidea da batzen gaituena. Borrokaren premia hortik datorkigu, inposatua. Borrokaldi bakoitza eta borroka guztien balioa inposizio horri atxikitzen zaio ezinbestean, norberarentzat soilik ez, beti besteentzat ere baliagarriak, hurrengoentzat, urruti daudenentzat. Baita EPPKren ildoaren aurka egon edo kritika baino egiten ez dutenentzat ere.

Elkar josi beharreko puzzle zatien arteko uztardura egokiaren bermetakoa. EPPK eragile politiko antolatua, prozesuaren mamiari heltzearen premia bermatze aldera bere ekarpena egingo duena: status politikoaren aitortza eta eskubide guztien araberako jarduera. Hogeita bost urteko iruzurra autonomista agerian jarri duen funtsezko eragile izaki, arrisku berean ez erortzeko abisua da bere horretan.

Herri honen aitortzak, eskubidearen subjetuarena alegia, eta erabakitzeko gaitasuna-askatasunak osatzen duten eskubidea da oinarri oinarrizko mami demokratikoa, edozein konponbidek ezinbesteko osagai duena. Erabakitzeko askatasun horretarako, elementu oinarrizko eta formalak barne, perspektiba ez menpekoaren premia ere barneratu beharra dago, uneoro, baita "bake prozesua" martxan egon daitekeen uneetan ere. Horretan indar laguntzaile ezinbestekoa izango zaigu espetxeetan landutako argitasuna, erdizkako egiak nolako gezurrak bilakatu ohi diren ikasi baita hantxe, zuzendariekiko bilera frankotan. Estatuen txantai eta mehatxuei aurrez aurre begiratzeko gaitasuna birsortu beharra baitago egunez egun, eskaintzarik egon ohi den uneetan bereziki.

Eta ikuspegi kolektiboa beti presente, herri gisa pentsatu eta aztertzeko gaitasuna inoiz baino finkoagoa behar dugula. Okerren dauden kideen egoeraren argitan jokatzen jakin duen Kolektiboak une honetan perspektiba politiko eta historikoan berdin jokatu beharra agertarazten du, eta ez bihar etzirako utziaz egungo arazo nagusiak, norberaren eremuari soilik erreparatuta. Lurraldetasunarena izango da, beraz, gakorik gakoena eta Euskal Herriaren berrosatze dinamika prozesuaren balioaren neurria.

## ETORKIZUNARI BEGIRA:
ZORRAK KITATU ETA ASKAPEN PROZESARI BERREKIN

Borroka eta askatasunaren aldeko grina berri askoren sortzailea izan da eta da EPPK. Horixe izan daiteke bere ekarpenen laburpenik behinena. Honen guztiaren loratzea ikusteko parada izan dezakegu une politiko honetan. "Nos parieron nuestr@s hij@s" Halaxe diote harro eta ozen zapi zuriz jantzitako amek.



Antzekorik badugu esateko Etxeraten kinke hori, zapi eran ere, bihotzean iltzatu dugun guztiok. Euskal Herriari zor zaio erreparazio historikoa. Biktima baino askoz ere gehiago da preso eta errepresaliatu guztien izaera. Prozesuari begira ekarpen ezinbestekoa dute, gatazkaren gainditze sakon eta egiazkoari ekiteko. Parte hartze bide propioak eta bere izate politikoaren aitortza ere zor zaie, ez geroan, dagoeneko baizik.

Sare sozialean lekua dutela frogatu egin dezakegu egun. Begibistakoa da ez dagoela bergizar-teratzerik, sakabanaketaren gainetik, urruntzearen oztopoak gaindituaz, bertatik bertara bizi

dira-eta. Komunikazio eta parte hartze molde horiek eguneratu, sendotu, indartu behar ditugu, etengabe. Komunikazioaren lehentasuna geroari begirako perspektiban kokatu. Izan ere, babesa, elkartasuna, euskal gizartean modu eragilean, aktiboan, bizitzeko apustua du egina EPPK-k. Ez soilik gatazka gainditzeari begira, ez soilik konponbide demokratikoa eskuratzeari begira.

Nazio eta jendarte askapen osoari begirako indar eragile kualifikatua dugu EPPKrena. Horregatik, adibidez, Espetxeak apurtu! Aldarria ez da bere desagertzearekin desagertuko. Egungo gizarte eredua, jendarte sail gero eta zabalagoen aurkako kriminalizazioa, etorkinen aurkako jazarpena... Auzi hauen inguruan berebiziko garrantzia izango duen ekarpena izango da EPPK osatu duten gizon emakumeena. Horregatik guztiagatik, urgentzia gurea da. KALERA!!!! EPPK osatzen duten gizon emakumeen baloreak egungo basamortu neoliberalaren morrontzapean ura bezain preziatuak, beharrezkoak.

Matxinoa beti matxinatuko baita injustizia ororen kontra. Eta horiek bai direla ezinbesteko! EUSKAL



HERRIRA!, konponbide demokratikoaren parte ezinbestekoa baitira. Euskal preso politikoen izate eta STATUS POLITIKOAREN AITORTZA, gatazkaren izaera politikoaren ukazio bailitzateke bestelakorik. Eta parte hartze eskubidearen ukazio larria. AMNISTIA!, gatazkaren gainditze zinezkoaren ahizpa bikia.

Euskal herriaren eskubideak urratzen dituzte Frantziak eta Espainiak. Gure herriari izateko eta erabakitzeko ahalmena ere ukatu egiten diote bi estatuok. Areago, herri bezala desager gaitezen ahaleginetan temati eta kupidarik gabe aritu dira mende askoan. Garaiotan ere ari izaten diren grina beretsuarekin.

Ukazio horrek sortzen du gatazka politiko eta armatua gurean.

Egun, Euskal Herrian, komunikabideak ixten dituzte; antolakunde politikoak legez kanpo jartzen dituzte; gazte eta gizarte mugimenduak kriminalizatu eta beren kidegoa kartzelatzen dute; gure herria zatikatzen duten marko juridiko-politikoak dira indarrean eta indar armatuz ere inposatuak; euskara erasotu eta desagertzeko arriskutan jartzen dute; eta errepresaliatuen kopuruak gora eta gora egiten du.

Euskal Preso Politikoen Kolektiboa osatzen dugun euskal herritarrok jatorri politiko aniztun izanik, Euskal Herriaren alde lan egin eta borrokatzeagatik izaten gara atxilotuak, torturatuak eta kartzelatuak. Gatazka politikoaren eragile eta ondoriozkoak gara. Jatorri eta izaera politikoa dugu, beraz.

Jatorri eta izaera politikoa dugun heinean, kartzelatuak izan garen euskal herritarrok EPPK-a osatzen dugu, Euskal Herriaren alde egiten segitzeko asmoz. Kartzela esparrutik eta molde bateratuaz eragiteko tresna dugu, izan ere, Kolektiboa. Gatazka politikoarekiko loturari irmoki eutsi eta gure partehartzea euskal prozesu politikoan bideratzeko tresna modukoa, alegia.
Hori, besterik ez baita EPPK-a.

## **GATAZKAREN** *KONPONBIDEA*

Euskal gatazkak badu konponbide demokratikoa. Nazio eraikuntzan urrats sendoak eman eta gure herriaren eskubideak errespetatuak diren neurrian, gatazkak izango du konponbidea, justizian eta euskal demokrazian oinarriturik.

Pentsatuezina da, ordea, inoiz gatazka gaindituko denik euskal preso eta iheslari politikoon egoerak bideratu gabe. Alta, presoon alde lan serio eta jarraitua egitetik aukera berriak sortuko dira gatazkaren konponketari begira.

EPPK-k berebiziko papera jokatu behar du edonolako konpontze saiakeretan. EPPK-k eragiten du justizian eta demokrazian oinarritutako konponketa baten alde, gure herriaren eskubideen errespetuan oinarritutako konponketa baten alde. Eta Amnistia Osoa ondorioztatuko da, ezinbestela, gatazkaren gainditze bidean.

## **ESKUBIDE** *POLITIKOAK*

Euskal Herriaren alde lan eta borroka egiteagatik kartzelatuak izan garen herritarrok bagara, izan ere, eskubide beteko eragile politikoa. Euskal herritar ororen eskubide zibil eta politiko beretsuen jabe, halaberean. Baditugu eskubide kolektiboak, batez ere euskal prozesu politikoan parte hartzeko eskubidea. Eskubide honen berma osatzen duten gainerako eskubide politikoak honako hauek dira:

· *Euskal Herrian bildu eta elkartzeko eskubidea.*

· *Euskaraz bizitzeko eskubidea.*

· *Geure burua antolatzeko eskubidea.*

· *Kolektiboa ordezkatuko duen Mintzakidetza osatzeko eskubidea.*

· *Gainerako eragile instituzional, politiko, sozial eta sindikalekiko harremanak izateko eskubidea.*

· *Euskal Herria lotetsiko duten eztabaida eta erabaki guneetan parte hartzeko eskubidea.*

Gure jatorri eta izaera politikoaren aitortzatik eratortzen dira arestian aipatutako eskubide politikoak. Aitortza hauxe ezinbesteko urratsa da gatazkaren konponketari begira, AMNISTIA OSOA gatazkaren konponketaren ezinbesteko atala izango den bezala.

# 1977

**77.12.09:** Fran Aldanondo, azken euskal preso politikoa, Martuteneko kartzelatik irten zen. Ondarru bere sorterria paralizatu zuen greba orokorra eta amnistiaren aldeko etengabeko manifestazioen artean sinatu zen bere indultoa.

# 1978

**78.01.04:** Oreretan atxilotutako bi pertsona espexeratu ondoren, kartzela ziklo berri bat hasten da. Zazpi egun beranduago Iruñean atxiloturiko Maximo Aierbe eta Juan Mari Olano izan ziren luzerako kartzelatu zituzten lehen euskal preso politikoak.

**78.01.19:** COPEL *(Colectivo de Presos en Lucha)* taldeak komunikatu baten bidez, Euskal Herriak bere askatasunerako bidean daraman borrokarekin bat zetozela argitu zuen eta euren egoera salatzeko norberaren aurkako ekintzak burutu zituzten *(lixiba edan, karea, koilarak eta bizarra mozteko kutxillak jan, zainak moztu eta abar.)*

**78.06.13:** Ihesladirako bi tunel aurkitu zituzten, Carabanchelen eta Iruñean hurrenez hurren.

**78.07.30:** Iruñean zeuden bost euskal preso politiko Burgosera eraman zituzten.

**78.09.15:** Gose greban hogei egun eman ostean, Rego Vidal Carabanchelgo ospitalean ingresatuta.



***Carabanchelen, berriz ere, euskal presoak borrokan.***

**78.09.25:** Amnistia eta lege antiterroristaren deuseztapena eskatuz, hogei euskal preso politiko gose greban. Protestaldia hilabete osoan luzatu zen.

**78.10.28:** Burgoseko euskal presoek amaitutzat eman zuten gose greba, jan gabe hogeita hamahiru egun egon eta gero.

**78.12.27:** 97 euskal preso politiko Soriako kartzelara eraman zituzten.

**78.12.28:** Soriako euskal preso politikoak inkomunikatuata eta gose greban. Tentsio handia kartzela barruan, polizia bertan dagoelarik.

# 1979



***Monzon eta Solabarria Soriako kartzelaren inguruan, poliziak 1979an zapuztu zuen martxan.***

**79.01.03:** Euskal preso politikoen Kolektiboaren kopurua honako hau da: 105 Sorian, lau Martutenen eta bi Burgosen.

**79.01.05:** Amnistiaren aldeko batzordeek 80 presoen babesa jaso zuten.

**79.01.31:** Antolakunde guztietako euskal preso politikoak gose greban Sorian. Amnistia orokorra zein bizi baldintzen hobekuntzak zeuzkaten aldarri.

**79.02.19:** Soriako hamabi presok (autonomoak, miliak eta poli-miliak) zainak moztu zituzten.

**79.02.27:** Juan Jose Rego kinka larrian 30 eguneko gose greban eman ondoren.

**79.03.02:** Bruselasen senideek protestaldi ekimen bat burutu zuten egun berean 29 euskal preso politikok zainak moztu zituzten Sorian.

**79.03.06:** Carabancheleko presoek hartu zuten Soriakoen gose grebaren lekukoa.

**79.03.08:** Gose greba amaitu bezain laster egundoko sarraldia egin zuen Polizak Soriako kartzelako laugarren galerian.

**79.04.12:** Ihesaldirako zulo bat topatu zuten Soriako espetxean.

**79.05.05:** Soriarako kartzelara deituriko martxa debekatu eta zapuztu zuen gobernuak. Halere, HBko parlamentari eta kide batzuk iritsi eta prentsaurrean salatu zuten euskal preso politikoen egoera.

**79.06.05:** Herrera da la Manchako kartzela ireki zuten.

**79.07.04:** Bisitak eten egin zituzten euskal presoek, irtetzerakoan kolpatu egiten baitzituzten.



***Fran Aldanondo Ondarrura iritsita, askatu zuten egun berean.***

**79.07.12:** ETA pm-ko presoek Gernikako estatutari babesa emateko eskatu zuten.

**79.08.05:** Hamalau poli-mili Basauri eta Martutenera eraman zituzten.

**79.9.25:** ETA p-mko 26 preso Autonomia Estatutuaren aldeko gose greban

**79.09.28:** Sorian, Iruñean eta Basaurin zeuden ETAm-ko presoek gose greba egin zuten, ihesalari zein amnistiaren alde eta, bide batez, Estatuaren erreferendumenan abstentzioa eskatzeko. Bi autonomok bat egin zuten protestaldiarekin.

**79.10.17:** Fran Aldanondo, indultatu zuten azken euskal preso politikoa, tiroz erail zuen Guardia Zibilak Tolosan.

**79.12.31:** urtea 142 euskal preso politikorekin amaitzen da.

# 1980

**80.01.02:** Iruñako kartzelan ihes egiteko tunel bat aurkitu zuten.

**80.01.23:** Baionako kartzelan ziren euskal preso politikoek otsailaren 7an amaitu zen gose greba abiatu zuten.

**80.03.09:** Iñaki Pikabea Oreretako euskal preso politikoa parlamentari aukeratu zuten Gasteizko legebiltzarrean.

**08.04.80:** Istiluen kontrako polizia sartu zen Basauriko gartzelan eta metraileta tiro-sorta jaurtiki zuten espetxe barruan.

**80.04.21:** Basauriko hamar euskal preso politiko gose greban Amnistiaren alde.

**80.05.15:** Soriako kartzelan lur azpiko beste pasabide bat aurkitu zuten.

**80.06.14:** Izugarrizko sarraskia Soriako kartzelan. Espainiako poliziak 21 preso zauritu zituen, haietako zortzi oso larri.

**80.06.16:** Euskal preso politikoen senide talde bat Gasteizko legebiltzarretik kanporatua.

**80.06.19:** Espainiako polizia Soriako kartzelatik irten arte bisitarik ez zutela egingo esan zuten bertoko presoek.

**80.08.06:** Soriatik enegarren ihesaldi saiakera zapuztu zuten.

**80.08.17:** Herrera de la Mancha eta Burgosera sakabanatu zituzten hainbat euskal preso politiko.

**80.10.04:** Soria, Burgos eta Carabanchelen zeuden euskal preso politikoak gose greban.

**80.12.01:** Terrorismoaren kontrako lege berria indarrean.

**80.12.31:** 220 euskal preso politiko, urteko azken zenbaketan.

# 1981

**81.02.13:** Joxe Arregi Carabancheleko eritegian hil zen, DGS-an basatiki torturatua izan ondoren. Horren kariaz, gose greba egin zuten ehunda berrogeita hamar euskal preso politikok.




**81.02.23:** Estatu golpea zela eta, Carabanchelgo euskal preso politikoak atera eta afusilatzen ahalegindu zen Pardo Zancada komandantea. Sarrerako guardia zibilekin tira-birak izan ostean, bere helburua bete gabe erretiratu egin ziren militarrak.

**81.05.03:** Euskal preso politikoak gose greban berriro ere.

**81.05.12:** Barne Ministraritzaren arabera, Carabanchelgo espetxea asaltatu eta ehun preso askatu nahi zituzten euskal erakunde armatu batzuek. Hainbat atxilotu egon zen eta preso "arriskutsuenak" (hamasei) Soriako kartzelera eraman zituzten.

**81.05.27:** Soilik delitu terroristak epaituko zituen Auzitegi nazionaleko 3. saila eratu zen.

**81.06.19:** Juan Jose Crespo Galende, PCR(r)-ko preso politikoa hil zen Madrilen, gose greban ehun egun inguru eman ostean.

**81.07.22:** Puerto de Santa Maria: 119 euskal preso politikoen destinu berria. Polimiliak, ordea, Langraizera.

**81.07.27:** Puertoko euskal presoak gose greba mugagabean.

**81.08.25:** Puerton gose greban daudela, Carabanchel eta Soriakoek ere protestaldiari eutsi zioten, haiek ere janaria ez hartuz.




*Juan Jose Crespo Galenderen oroigarria.*

**81.09.07:** Yeseriaseko euskal preso politikoak gose greban.

**81.10.08:** Marsellako kartzelan diren lau iheslari politikok gose grebari ekin zioten.

**81.12.12:** Dagoeneko 150 euskal preso politiko dira gose greban daudenak. Bizi baldintzak eta Euskal Herriko egoera ziren protestaldiaren gakoak.

**81.12.17:** Gose greban ziren euskal preso politikoen kopurua handitu zen: 176 espetxe ezberdinetan.

**81.12.31:** Urtea marka berri batekin amaitzen da: 435 euskal preso politiko itzalpean.

# 1982

**82.01.18:** Hogeita hamazazpi egun pasatu ondoren, amaitutzat jo zuten gose greba Puerton, Carabanchelen, Sorian eta Yeseriasen.

**82. 05.12:** Hogei metroko luzaera zuen tunel bat aurkitu zuten Carabanchelgo estoldetan. ETAko presoei leporatu zieten egiletza.

**82.07.02:** Lekualdatze batean balaz zauritu zituen lau euskal preso politiko Guardia Zibilak.

**82.08.28:** Hamabost egun lehenago irekitako Alcalá-ko espetxera 153 euskal preso politiko eraman zituzten Soriatik.



Puerto I-eko sarrera nagusia.

**82.09.27:** KAS alternatibaren aldeko gose greba bat abiatu zuten Puerto, Alcalá, Yeserías eta Carabanchelgo kideek.

**82.09.29:** Arantza eta Rosa Amezaga, euskal preso politiko baten arrebak kotxe istripuz hil ziren, neba epaitu berri zuen Auzitegi Nazionaletik zetozela.

**82.10.24:** Alcalán dauden ETA pm-ko presoak gose greban, EEk hitzartutako bide ustela salatzeko asmoz.

**82.12.10:** Kalefakzioa ez zebilela eta protesta burutu ondoren, jipoituak izan ziren Alcalá-ko euskal preso politikoak.

**82.12.14:** Puertoko kartzelara eraman zituzten lehen euskal preso politikoak.

# 1983

**83.01.06:** Agiri baten bidez, beren bizmodu traketsa salatu zuten Yeseriaseko euskal preso politikoek.

**83.03.09:** "Terrorista damutuen bergizarteratzeko" plangintza bat iragarri zuen espainiar gobernuak; hala, epe baterako zigor murrizketak onartu ziren borroka armatuari bizkarra ematen zioten "terroristei". Lege aldaketa honek damutzea eta poliziarekin kolaborazio sarituko ditu.

**83.05.12:** Puertora 22 kide eraman behar zituztela eta, motina egin zen Carabanchelgo hirugarren galerian. Istiluen kontrako poliziak sartu eta kalte handiak eragin zituzten. Ondorioz, hogeita hamar bat kide zigor zeldetara eraman zituzten.

**83.08.24:** Puerto de Santa Marian 51 preso politiko zigortuta kartzelarien tratua salatzearren.

**83.06.18:** ETAk bere gain hartu zuen Puertoko medikuaren exekuzioa. Agiri berean, euskal preso politikoak dauden kartzela guztietako funtzionarioak helburu militar gisa hartu zituen.

**83.10.25:** Herrera de la Mancharako lehen trasladoak egin ziren.

**83.11.01:** Lekualdatze berriak egin aurretik, berrogeita hamar guardia zibil gehiago destinatu zituzten Herrerara.

**83.11.15:** Kunda bakar batean, Puerto hustu eta Herrerara eraman zituzten euskal presoak.

**83.11.22:** 132 euskal preso politiko jadanik Herreran.

**83.12.31:** Madrilen inguruan, identifikatu ezin daitezkeen pertsonek erasotu zuten Herrerara zihoan senideen autobusa.



# 1984

**84.01.07:** Herrerako espetxearen aurrean presoen hirurehun senidek burutu zuten lehen kontzentrazioa.

**84.16.01:** Pau eta Baionako kartzelan ziren IKko kideak gose greban.

**84.02.21:** Herreran zeuden euskal preso politiko guztiak komunikazio grebari egin zioten. Izan ere, eremu militarreko araudiari muzin egin eta kanpoko harreman guztiak eteteko erabakiarekin hautsi nahi izan zuten bertoko erregimen gogorra.

**84.03.31:** Txapeoak aurrera egin ahala, senideak ere kontzentrazioak egiten hasi ziren Herrerako kartzelan. Ekimen hau izan zen, beraz, Herrerarako Martxen aurrekaria.

**84.06.09:** Nazioarteko Gurutze Gorriko delegazio batek hitz egin zuen borrokan zeuden Herrerako euskal preso politikoekin.

**84.06.16:** Kontrol ugari jarri arren, mila pertosna inguru hurbildu ziren Herreraraino Euskal Herritik. HBko delegazio batek zuzuendariarekin hitz egin zuen.

**84.07.03:** Borroka bertan behera uzteko zuzuendaritzak egindako proposamena onartzea baztertu zuten Herrerako presoek. Egoerari heldu eta gauzak errotik aldatzeko bermeak ematen ez zituelako.

**84.09.02:** Guardia Zibilaren etengabeko presentziak tenkatu zuen Herrerako egoera. Tentsio handiak.

**84.09.22:** Amnistiaren aldeko Batzordeek deituta, 3.000 lagun manifestatu ziren Herreran. Itzultzerakoan, manifestazioa egin zuten Madrilgo kaleetan.

**84.12.13:** Erresistentzia jarreragatik funtzionario askok arazo psikolojikoak jasan eta gero, akordio bat lortu zen Herreran, eta zuzendariak bukatutzat eman zuen euskal presoen isolamendua, bizi baldintzak nabarmen txukunduz. Borrokaldiaren amaiera garaipen handitzat hartu zuen EPPKk.

**84.12.29:** Beste 4.000 pertsona Herrerarako Martxan. Euskal preso politikoen kopurua 419koa da.

# 1985

**85.03.09:** Errepresioak jarraitu zuen Herreran. Ondorioz, hainbat preso gose greban jarri ziren, eta protestaldia beste kartzeletara ere zabaldu zen. Egun gutxiren buruan, 180 kidek bat egin zuten grebarekin. Elkartasunak agintzen zuen.

**85.03.28:** Gose greba amaitu zen espetxe orotan.

**85.06.25:** Jose Ramon Goikoetxea euskal preso politikoa, urkatuta agertu zen Alcalá-ko dutxetan.

**85.07.07:** Iñaki Pikabeak eta Joseba Sarrionandiak ihes egin zuten Martuteneko kartzelatik.

**85.07.16:** Espetxea iraki berria zegoela presoak torturatzeagatik hainbat funtzionario zigortu zuten.

**85.07.23:** Herrerako lehen moduloko preso guztiak hamalau egunez zigorturik.

**85.11.25:** Yeseríasen zeuden euskal preso politiko guztiak Carabanchelera eraman zituzten.

**85.12.28:** Lau mila pertsonak hartu zuten parte Herrera aurreko kontzentrazioan.

**85.12.31:** Urte amaieran 369 euskal preso politiko zeuden kartzelaturik.

# 1986

**86.01.24:** Carabanchelgo euskal preso politikoak gose greban.

**86.06.04:** Berriz ere, Kolektibo osoa gose greban.

**86.06.08:** Joseba Asensio Artaraz Indautxuko presoa hilik agertu zen bere ziegan. Herreran hildako lehen euskal preso poltikoa izan zen.

**86.07.02:** Amnistiaren aldeko Batzordeek gogor salatu zituzten sarraski espetxe barruan dauden baldintza sanitario penagarriak.

**86.07.03:** Espetxe zuzendari orokorrak salaketak ukatzen zituen bitartean, Herrerako presoak gose greban zeuden.

**86.07.14:** Laurogei kide Herrerako isolamenduko egoeran.




**86.07.25:** Euskal preso politikoek amaitutzat jo zuten gose greba.

**86.08.11:** Txikierdiren kontrako hilketa saiakera Baionako kartzelan.

**86.09.19:** ETAren ekintza baten ondorioz, Yoyes hilda.

**86.10.05:** Alcalá-ko preso guztiak beren ziegetan isolaturik.

**86.10.23:** Herrerako laugarren moduloan zulo bat aurkitu zuten kartzelariek.

**86.12.14:** Gabi Mouesca eta Maddi Heguy, IKko militanteak, ospa egin zuten Pabeko kartzelatik, talde armatu baten laguntzarekin.

**86.12.27:** Ordura arteko Martxarik jendetsuena egin zen Herreraraino: sei mila pertsonak hartu zuten parte.

**86.12.29:** Hilabete nahasi batzuk igaro ostean, istilu larriak Alcalá-ko kartzelan, bertoko bizi baldinzak gogortzeko asmoari sendo erantzun baitzioten euskal preso politikoek.

**86.12.31:** Euskal preso politikoen kopuruari dagokionez, 477 zenbatu ziren urtearen hondarrean.

# 1987

**87.01.23:** Euskal preso politikoen kontrako sakabanaketa politikaren lehen urratsa eman zen: Ocaña, Huesca eta Daroca dira Herreratik ateratako kide batzuen destinu berriak.

**87.01.24:** Kide berriak sakabanatuta, oraingo honetan Almeriako kartzelara. Aurrekoekin batera, gose greba eginez erantzun zioten espetxe politika berriari.

**87.02.10:** Herrerako kideek planto egin zuten sakabanaketari aurre egiteko. Protestaldia zapaltzeko Guardia Zibila sartu zen moduloetan. Ia Kolektibo osoa zigortu zuten, dispertsioaren salaketa helburu zuen borrokan parte hartzegatik.

**87.02.22:** Carabancheleko emakume kideek gogor zigortuak sakabanaketaren kontrako

dinamika ahultzeko. Polizia Nazionala euren moduloan sartu eta ziegetan itxiarazi zituzten.

**87.02.26:** Karlos Ioldik hitz egin zuen Gasteizko parlamentuan.

**87.02.28:** Iparretarrak antolakundeak azaldu zituen prentsaurrean Hegi eta Mouescaren ihesaldiaren gora-beherak.

**87.03.12:** Astebeteko gose greba Alcalá-Mecon.

**87.03.25:** Herrerako presoak 42 egunez isolamenduan.

**87.05.19:** Josu Retolaza, gaixotasun sendaezin batek jota kaleratu berria, bere etxean zendu zen.




**87.07.18:** Istiluen kontrako poliziak sarraldi berria egin zuen Alcalán. Gose grebak eta txapeoak orokortu ziren tokian toki, errepresio orokorrari erantzunez.

**87.10.22:** Sakabanaketaren mapa zabaldu zen: Murcia, Segovia Badajoz, Albacete, Huesca eta Castelló.

**87.11.16:** Langraizeko presoak ere gose greban. Cordoba esukal preso politikoen destinu berria.

**87.12.10:** Badajozen zeuden bi preso, Benantzio Sebastian Horcajo eta Joxean Kortadi ospialera, 45 egun jan gabe eman ondoren. Kortadi 48. egunera arte iritsi zen.

**87.12.26:** Herreratik sei kilometrora geldiarazi zituen poliziak kartzelaraino iritsi nahi zuten sei mila martxistak.

**87.12.31:** Guztira, 504 euskal preso politiko Kolektiboan, bi estatuetan. Espainian, hemezortzi kartzelatan sakabanaturik.

# 1988

**88.01.18:** Karlos Ioldi, Herrera de la Manchan espetxeraturik zegoen Herri Batasunako parlamentariak, Gasteizko Legebiltzarrean ETAren aurkako hitzarmenaren onespenerako batzarraldian ezin izan zuen parte hartu, eta ezin izan zuen alderdi abertzalearen iritzia publikoki azaldu, Bilboko Lurralde Entzutegiak horretarako baimenik eman ez ziolako.

**88.02.15:** Cordobako kideak gose greban, bizi baldintzak jasangaitzak zirela eta. Horren ondorioz, Etxaniz ospitalera eraman behar izan zuten.

**88.03.02:** Mikel Lopetegi kidea urkatuta agertu zen Herreran.




**88.03.11:** ETAk bonba-paketeak igorri zizkion hainbat kartzela arduraduneri.

**88.06.15:** Juan Karlos Alberdi Martiarena Herreran hil zen, medikuen utzikeria begi-bistan utziaz.

**88.10.01:** Iparretarrakeko kideak gose greban.

**88.11.03:** Istilu larriak Herrerako lehen moduloan, Guardia Zibila sartu eta jipoi kolektibo bat eman eta gero. Lau preso ospitalera.

**88.11.22:** Carabancheleko neskek protestaldi berriak egin zituzten.

**88.12.16:** Inoiz egin den Herrerarako martxarik jendetsuena atera zen Euskal Herritik. EPPKk 564 kide zeuzkan urte bukaeran.

# 1989

**89.02.13:** Herrerako lehen moduloko kide guztiak auzipetuak.

**89.02.27:** Kolektiboaren kidegoari gradu ezartzea abiatu zen.

**89.04.08:** Justiziako ministroak, Alcalá eta Herrerako kartzelariek bonba paketeak jaso zituzten.

**89.04.19:** Hogeita hamar euskal preso politiko Sevilla 2 espetxera.

**89.05.08:** Alcalako inguruan egindako ekintza armatu batean, bi polizia hilda eta kartzelari bat larriki zaurituta. ETAk helburtzat hartu zituen espetxe funtzionario guztiak.

**89.05.15:** Justizia ministerioak sakabanaketaren orokortzea iragarri zuen, euskal preso politikoak eta sozialak nahasteko borondatea defendatuz. Horrekin batera, kartzela berrietan dispertsatu ziren euskal presoak, kanariar uhartekoetan barne.

**89.05.27:** Alcalá-ko kartzelaren aurrean poliziek eta kartzelariek harrikatu zuten senideen autobusa. Hurrengo egunetan heriotz mehatxuak luzatu zitzaizkien euskal preso politikoei.



**Carabanchelgo Espetxe Ospitalean egindako argazki honetan jadanik sakabanatuta zeuden hainbat kide ikus daitezke: Bixente Nazbal, Goio Aldama, Xabier Beloki, Pedrotxo Guridi, Xabier Ioldi eta Jose Mari Sagardui Gatza, hain zuzen ere.**

**89.07.03:** Hasi zen emakume kideen sakabanaketa: 15 atera zituzten Carabancheletik. Horietako hiru jipoitu zituzten Valladolidera iritsi bezain laster.

**89.07.12:** Alcalá-Mecon gose eta egarri greban zeuden hiru kide ospitalera.

**89.8.01:** Hirurogeita zazpi espetxetan sakabanatuta ziren euskal preso politikoek txapeo mugagabea hasi ziren. Dispertsioaren kontrako lehen protestaldi orokor honetan, eskubideen defentsa sutsua egin zen.

**89.08.06:** Barrutik EPPKren aldizkaria lehen aldiz eman zen argitara.

**89.08.17:** Herrerako presoak basatiki jipoituak.

**89.08.23:** Sakabanaketa 79 kartzeletara zabaldu zen. Bi astetan 130 preso gehiago dispertsaturik.

**89.09.09:** Guardia Zibilek hamalau kide jipoitu zituzten Herreran.

**89.10.20:** Euskal preso politikoen halabeharrezko sailkapena iragarri zuen Espetxe Zuzendaritza Orokorrak.

**89.12.16:** Beren eskubideen alde eta kartzeletako egoera salatzeko, Kolektiboa astebeteko gose greban.

**30.12.89:** Hamabi mila pertsona inguru Herrerarako martxa nazionalean. Kolektiboak 541 kide zituen.

# 1990



**90.02.25:** Amnesty International erakundeak salatu zuenez, Philippe Bidart euskal preso politikoak "tortura zuria" jasaten zuen Pariseko La Santé kartzelan.

**90.03.02:** Sevillako kartzelatik ihesaldi bat zapuztu zuela iragarri zuen Espainiako barne ministroak.

**90.03.13:** Martuteneko karztelero bar ekintza armatuan hilik. Estatu osoko kartzelariak greban. Senideak mehatxatuta nonahi, presoak jipoituak espetxe askotan.

**90.05.25:** Sevillanoren heriotza zela eta, protestaldi ugari kartzeletan.

**90.07.01:** Pilar Arsuaga eta Alfontso Isasi senideak istripuz hil ziren.

**90.12.01:** Mikel Zalakain euskal preso politikoa Martutenen hil zen, bihotzekoak jota.

**90.12.09:** Antonio Guerrero Fontelvak, Ceutako zuzendariorde faxista, bonba-gutun bat jaso zuen.

# 1991

**91.01.27:** Jean Groixek bere buruaz beste egin zuen kartzelan. Bretoia, iheslariei babesa emateko akusaziopean espetxeratu zuten.

**91.03.18:** Yeserías-en zeuden euskal neska preso politiko guztiak Carabanchelera eraman zituzten.





**Herreran Zein Parisen, milaka herritarrek babestu zuten EPPkren borroka.**

**91.03.19:** Espetxeko GALa sortzeko saiakera salatu zuen preso sozial batek.

**91.06.28:** Sevillako kartzelako zuzendariari igorritako bonba pakete baten eztandak hiru hildako eragin zituen. Zoritxarreko gertakari horrek euskal preso politikoen eta preso sozialen arteko enfrentamenduak sortu zituen. Horrez gain, kartzelariek jipoitu zituzten gure kideak.

**91.07.01:** Justizia arloko goi maila-ko kargodun bati bidalitako bomba paketeak hiru polizia-artezilari hil zituen.

**91.07.24:** APREn bilduriko preso sozialek espetxeko GALa existitzen zela berretsi zuten.

**91.12.08:** Bi estatuan espetxeraturi-ko euskal preso politikoak gose gre-ban. Aldi berean, milaka perstonak eraman zuten elkartasunaren beroa Euskal Herriko presondegietera.

**91.12.14:** Gauerdian amaitu zen Kolektiboaren gose greba.

**91.12.28:** Presoekiko elkartasuna Herrerara eta Parisera eraman zituzten, Espainian 10.000 pertsoank gainditu zituzten polizia kontrolak Mantxaraino iristeko. Parisera ere makina bat jende bertaratu zen.

# 1992

**92.02.25:** Salto del Negroko euskal preso politikoek 24 egun zeramatzaten gose greban.

**92.03.07:** Saltoko greba jarraitzen zuen. Senitartekoen SOSa lau haizetara zabaldu zen.

**92.03.15:** Akordio bati esker amaitu zen Saltoko gose greba.

**92.03.17:** Ceutan zeuden euskal preso politikoek lekukoa hartu eta gose grebari ekin zioten, bakartzeari aurre egin eta oinarrizko eskubideen defentsan.




**92.04.21:** Hauetako batzuk larri zeudelarik, hitzezko akordio batek ahalbideratu zuen Ceutako gose grebalariek bertan behera uztea beren protestaldia.

**92.04.29:** Akordioa errespetatu ez, eta Saltoko kideak berriz ere gose greban.

**92.05.20:** Salton egarri greban. Egoera oso larria. Etengabeko mobilizazioek Euskal Herrian. Gasteizko parlamentuko giza eskubideen batzordeak, ordea, Saltora ez zela joango iragarri zuen.

**92.06.01:** Beste akordio bat zela medio, Saltoko kideek utzi zuten gose greba beren indarren mugan zeudenean.

**92.06.04:** Senideak-ek deituta, Arantzazuko monastegian gose greba bat burutu zuen jende andanak.

**92.07.01:** Puerto 2ko presoek hilabete batez luzatu zen gose greba bat egin behar izan zuten beren oinarrizko eskubideak errespeta zitezen.

**92.09.03:** Iñaki de Juana euskal preso politikoak gose grebari ekin zion Murtziako kartzelan zeldan bakarturik ez zezatela eduki eskatuz. Beste kideek bat egin zuten ekimenarekin. Sei hilabetetan bost gose grebetan parte hartu zuen De Juanak eta bere egoera fisikoa larria zen.

**92.10.06:** Presoen senideek espetxe barruko jipoiak ugaldu zirela salatu zuten kezka handiz.

**92.11.12:** Saltoko presoak berriro gose greban zeudela eman zen jakitera. Urte berean gorputza horrenbeste zigortzea aski gogorra izateaz gain, bueltaezina ere izan daitekeela salatu zuen euskal mediko talde batek

**92.12.25:** Presoekiko elkartasuna Herrerara eta Parisera eraman zituzten, egun berean, milaka euskal herritarrak. Herrerara iritsi zen azken martxa hartan 11.000 lagun bertaratu ziren 180 autobusetan. Bidenabar, beste ehunka batzuk hurbildu ziren Fresnes eta La Santé-ra.

# 1993

**93.01.22:** Martuteneko kartzelari bat tiroz hila.

**93.01.24:** Cacereseko presoak mehatxupean, gose grebari ekin zioten.

**93.02.11:** Juan Maria Atutxak euskal preso politikoen abokatuak jarri zituen jopuntuan.

**93.02.22:** Erreinsertzio neurriak bultzatuko zituela eman zuen jakitera eusko jaurlaritzak.

**93.03.06:** Jose Maria Sagardui Moja, Granadan zegoen euskal preso politikoa, larriki zauritu zuten poliziek eta kartzelariek, ihes egiten ari zela harrapatu eta geroko erasoaldian.

**93.03.10:** Cacereseko kideek amaitu zuten gose greba, nahiz eta zuzendariak esakinitako hitzarmena nahikotzat ez zuten jo.

**93.05.15:** Parisen Pello Mariñelarena presoa hil zen, medikuen utzikeriak larriagotutako gaixotasun baten ondorioz.



Gatza zauritu ondoren, poliziek anbulanzian sartu zuten.

**93.09.08:** Alberto Bellochek, Espainiako Justizia ministroak, euskal presoak estatu afera direla adierazi zuen.

**93.10.25:** Uruguayen zeuden euskal preso politikoak gose greban.

**93.11.20:** Elkartasunezko mobilizazio erraldoien artean bertan behera utzi zuten kideek Uruguayko kartzeletan egindako borroka.

**93.12.20:** Ttotte Etxebeste kidearen askatasuna eskatzeko, frantziar estatuko kartzeletan zeuden kide guztiak borrokan. Mitterrandek egun gutxi beranduago indultatu zuen.

**93.12.24:** Presoen aldeko barauldi masiboa hasi zen Arantzazu. Zazpirehun lagun gose greban.

# 1994

**94.01.07:** Manuel Gómez Avilések, gobernuko mezulariak, hainbat preso bisitatu zituen.

**94.04.18:** Valdemoroko presoak beren ziegetan txapatuta.

**94.04.23:** Anoetako estadioa lepo, sakabanaketaren amaiera exijitzeko.

**94.05.27:** Pariseko kartzeletan zeuden euskal preso politiko guztiak beren ziegetan itxi ziren, isolamendua salatu eta bizi baldintzak hobetzeko.

**94.06.16:** Espetxeetako Nazioarteko Behatokiak euskal presoei emandako tratua txarretsi zuen.

**94.07.02:** Mila pertsona Valdemoroko ingurumarietan, borrokan zeuden presoak babesteko.

**94.08.11:** Beren extradizioa ekiditeko, gose greban Uruguayko kartzeletan zauden euskal preso politikoak.

**94.08.25:** Bortizkeria Montevideon euskal presoak babestera hurbildu zen jendetzaren kontra. Bi hildako (Fernando Morroni, Roberto Facal) eta hamarka zauritu errepresioaren eraginez.



**94.09.03:** Beren eskubideen ukazio sistematikoa salatzearren, espainiar estatuan preso ziren kideak gose greba berri bat hasi ziren.

**94.09.07:** Frantziar estatuko kideek bat egin zuten borrokarekin, haiek ere jan egiteari uko eginez.

**94.09.18:** Ia zortzirehun pertsona gose greban, 115 herrietan, presoen borrokari sostengua eman eta elkartasuna adierazteko.

**94.12.17:** Martxa Parisera. Guztira, 554 preso EPPKan.

# 1995

**95.03.06:** Navalcarneroko euskal preso politikoak gose greban.

**95.04.22:** Fresenesen ere, gose greba bilakatzen da oinarrizko eskubideak defenditzeko bide bakarra.

**95.04.29:** Frantziar estatu osoan ziren euskal preso politiko guztiek batera erantzun zioten errepresioari, eta gose greba bat hasi ziren.

**95.05.06:** Pariseraino joan ziren ehunka euskal herritar, gose greban ziren presoen eskakizunekin bat eginez.



**95.05.13:** Fresneseko borroka bukatu zen.

**95.06.17:** Javi Gorostiza preso ohia hil egin zen.

**95.06.22:** Espetxeetarako Nazioarteko Behatokiko 94ko txostenak euskal preso politikoen eskubideen kontrako urraketei tokia egin zion.

**95.06.23:** Tenerifen dispertsatuta zeuden kideek gose grebari ekin zioten, bizi baldintzen endekapena zela kausa.

**95.08.07:** Udaberrian bezala, beste behin gose greban Navalcarneroko euskal presoak.

**95.09.18:** Jaengo kideak gose greban hasi ziren.

**95.10.02:** Txandaka ekin zioten gose grebari Sevilla eta Salto del Negroko euskal preso politikoek.

**95.11.12:** Parisera joateko zen elkartasunezko martxa itxita aurkitu zuen mugako langa, beraz, Hego Euskal Herritik Sevillara joatea erabaki zen. Horrekin batera, mila pertsona inguru lortu ziren Parisera iristea, eta bertan manifestatu ziren.

**95.12.19:** Euskal Presoak Euskal Herrian egon arteko txandakako gose greba mugagabea hasi zen Donostiako Artzai Oneko katedralean.

**95.12.31:** Urteko azken egunean 547 kide zeuden munduko espetxeetan.

# 1996

**96.01.06:** Joan zen urtean seirehun lekualdatze baino gehiago egin ziren.

**96.01.14:** Euskal Herrian berbatzea helburu, ekinbide mugagabea iragarri zuen EPPKk.

**96.01.19:** Europar Parlamentua sakabanaketaren kontra.

**96.02.01:** ETAk bere gain hartu zuen Ortega Lara kartzelariearen arrestatzea, eta gogor salatu zuen espetxeetako bizi baldintzak zein kartzela politika.

**96.02.26:** Euskal Herriko ehun udaletxe dispertsioaren kontra.

**96.07.11:** Espetxe agintariekin hitz egin ahal izateko bere mintzakideak kartzela bakar batean biltzea eskatu zuen euskal preso politikoen Kolektiboak.

**96.07.18:** Kartzelarien hanbat sindikatu ETArekin negoziatzearen alde mintzatu ziren.



**A Coruñako espetxera egindako martxa. Herritarrek gainditu zuten sakabanaketaren eragina.**

**96.09.10:** Borroka fase berri baten atarian, dispertsioari amaiera emateko gose grebak burutu zituen EPPKk.

**96.11.15:** Gaixo zegoen Inaxio Mendiburu presoak Gasteizko bi parlamentarien bisita izan zuen Langraizen, bat EAkoa, bestea IUkoa.

**96.11.18:** Agiri baten bitartez, euskal presoek gogoratu zuten beren borroka iraunkorra dela, harik eta Euskal Herrira itzuli arte.

**96.12.17:** Artzai Oneko ekimena hasi zenetik urtebete igaro zelarik, eskuz esku jarraitzen zuen astebeteko barauen txanda pasa.

**96.12.31:** 531 euskal preso politiko urteko azken gaua piztuz.

# 1997

**97.02.07:** Jose Mari Aranzamendi Katxue, eskuak eta oinak loturik urkatuta agertu zen bere ziegan.

**97.02.13:** Legebiltzarreetako Giza Eskubideen Batzordeko Ponentziak euskal presoak hurbiltzeko proposamena onetsi zuen. Euskal Herritik 300 kilometroetako distantzian zeuden 14 espetxetan berbatzea proposatu zuen.

**97.02.18:** Juan Lorenzo Lasa Mitxelena Txikierdi, aipatu Batzordearekin elkarrizketa bat eskatu



***Egun Granadan jarraitzen duen Txikierdik (argazkian, goiko ilaran bigarrena ezkerretik) Gasteizko parlamentuarekin elkarrizketatu zen.***

zuen. Honek onartu zuten berehala.

**97.03.04:** Alcalá Meco izan zen elkarrizketaren tokia. Txikierdik txosten bat eman zien Gasteizko parlamentariei.

**97.03.11:** Francisco Javier Gomez Elosegi, Martuteneko psikologo eta ELAko kidea, tiroz hil zuten Donostian.

**97.03.13:** Antxoni Fernandez istripuz zendu zen biloba bisitatzera zihoala.

**97.04.05:** Gose greban zeuden euskal preso politikoen kopurua ehundik gorakoa zen.

**97.04.26:** EPPKk hurrengo udazkena jarri zuen gehienezko epea sakabanaketari amaiera emateko. Horren ezean bere protestaldiak gogortuko zituela esan zuen.

**97.05.30:** EPPKk bilera bat eskatu zuen Nafarroako Parlamentuko Giza Eskubideen batzordearekin.

**97.07.01:** Guardia Zibilak Ortega Lara askatu zuen Arrasaten.



***El Duesoko kideak, besteak beste, aberriratzearen aldeko borrokari lotu zitzaizkion 1997ko udazken hartan. Argazki honetan frontoiaren alboan daude.***

**97.7.10:** ETAk PPko zinegotzi bat arrestatu zuen Ermuan, eta hogeita lau orduko epea eman zion gobernuari euskal preso politiko guztiak Euskal Herrira eramateko.

**97.07.12:** ETAk  Miguel Angel Blanco hil zuen. Jipoiak eta mehatxuak kartzeletan.

**97.07.21:** Juan Carlos Hernando Peli, Arrigorriagako euskal presoa, urkatuta agertu zen Albaceteko kartzelan.

**97.08.26:** Ipar Euskal Herriko PSFk eskatu zuen euskal presoak aberriratzea.

**97.10.27:** Santi Diez Uriarte euskal preso politiko ohia hil zen Basurton. Martxoan askatu zuten hilurren, berandu diagnostikatu zioten minbizia sendaezina zenean.

**97.11.02:** Bitartean, berbatzearen aldeko txandakako borroka aurrera zihoan. Soto del Real, Jerez de la Frontera, Salto del Negro, Ocaña, Basauri, Cartagena, Topas eta Valdemoroko kideak batu ziren.

**97.11.06:** Ceuta eta Tenerifekoak ere borrokan.

**97.11.8:** Fresneseko euskal preso politikoek areagotu zituzten beren protestaldiak. Ondorioz, mitardera eraman zituzten.

**97.11.15:** Puerto I eta El Duesoko kideek bat egin zuten borrokarekin.

**97.11.17:** Castellón-en gose greban, Jaen-en txapeoa egiten zuten bitartean.

**97.11.23:** Malagan eta A Coruñan borrokari lotu ziren kideak.

**97.12.03:** Mayor Orejak adierazi zuen penintsulatik kanpo zeuden euskal preso politikoak hurbilduko zituztela oso epe laburrean.

**97.12.31:** 559 kide Kolektiboan.

# 1998

**98.01.15:** Aberriratzearen aldeko dinamikaren bigarren urteurrena zela eta, planto bat egin zuten euskal preso politikoek kartzela guztietan.

**98.05.18:** Fresnesen zegoen kideak txandakako gose greba bat egiten hasi ziren.

**98.09.16:** Bilbora etorri zirela, euskal preso politikoen eskubideen defentsan hitz egin zuten Irlandako presoen senideek.

**98.10.04:** Iñaki Lopez de Bergara kidearen elkartasunez, gose greba la Santén.

**98.10.15:** Gaixotasun sendaezinak zeuzkaten lau kide Euskal Herriko espetxeetara ekarri zituzten. Bideneabar, aske utzi zuten egoera berean zegoen beste bat.

**98.11.28:** Gehiengo politiko, sindikal eta sozialaren ordezkariek babestu zuten Senideak-ek Bilbon deitu zuen presoen aldeko manifestazioa, "Gabonetarako euskal presoak Euskal herrira" lelopean.

**98.12.02:** Lizarrako sinatzaileek Madrilen eskatu zuten euskal presoen hurbilketa.

**98.12.08:** Borroka ildo berri bat ireki zuen EPPKk, aberriratzea eta zigorraren hiru laurdena bete zuten kideen askatasuna exijitzeko helburuarekin.

**98.12.15:** Mitxel Sarasketa euskal preso politikoa epilepsia atake larria jasan zuen. Hurrengo egunetan aske utzi zuten.

**98.12.22:** Azkenean, espainiar penintsulatik kanpo zeuden euskal preso politikoak, hogei baino gehiago guztira, Espainiako hegoaldeko presondegietara ekartzen hasi ziren. Hainbat kasutan, ordea, bizi baldintzak okertu zitzaizkien nabarmen. Preso kopurua: 526 kide.



***Mitxel Sarasketa, bere etxera eraman zuten batean.***

# 1999

**99.01.02:** Berbatzearen aldeko planto orokorra egin zuten Kolektiboko kide guztiek.

**99.01.09:** Euskal preso politikoen alde sekula egin den manifestaziorik jendetsuak zeharkatu zituen Bilboko kaleak, Lizarra-Garaziko sinatzaileen deialdiari kasu eginez. Hamarka mila lagun Kolektiboaren eskubideen alde.

**99.01.12:** Gose greban Almeriako kartzelan.

**99.01.16:** Bi mila bostehun pertsona manifestatu ziren Parisen euskal presoen eskubideak




berma zitezen galdatuz.

**99.02.02:** Almeriako kartzelan 22 egunez luzatu zen gose grebari amaiera eman zioten. Badajozeko presoen baraua hasi zen.

**99.03.28:** Esteban Esteban Nieto kidea oso egoera larrian ospitalizatu zuten.

**99.04.07:** Esteban Nieto aske utzi zuen Auzitegi Nazionalak, minbizi sendaezina zuela-eta. Bestaldetik, Fleury Merogis-eko neska kideak gose greban zeuden.

**99.05.07:** Gasteizko Legebiltzarrak Espainiako Gobernuari presondegi-legedia bete zezala eskatu zion. Senideek eta Amnistiaren Aldeko Batzordeek deituta egindako Konpromiso Egunean milaka lagunek hartu zuten parte.

**99.0.13:** Frantziar Estatuko euskal presoek euren borroka areagotu zuten.

**99.07.03:** Hogeita hamar bat kide zinegotzi aukeratuta Hego Euskal Herriko herri bozketan. Udaletxeen konstituzioan beren parte hartze zein bertarazteak aukera eman zion jendarteari maitasuna eta elkartasuna adierazteko.

**99.08.16:** Josepa Ernaga presoak bost urteko isolamendua bete zuen.

**99.08.20:** Giraldilla ere presoekin.

**99.09.25:** Gasteizen, presoen aldeko ekimen berria abiatu zen. Herri kolektiboak, alderdi politikoak, gizarte ajenteak eta kultura zein jendarte mailako pertsonalitateen atxikimenduak abiarazi zuen Batera foroa, preso guztien aberriratzea xede zuen plataforma anitza.

**99.09.26:** Esteban Esteban Nieto Kroma hil zen.

**99.11.01:** Euskal preso politikoak mugagabeko gose greban. Borroka berri honek

Kolektiboak irekitako prozesu politikoan parte hartu eta erreibindikazio historikoen lorpena bilatzen zuen.

**99.11.04:** Agiri baten bitartez, bere estatus politikoa aldarrikatu zuen EPPKk, eta berau errekonozitzea eskatu zien gobernuei zein eragile soziopolitikoei.

**99.12.27:** 726 pertsona gose greban. Arrasate, Gasteiz, Iruñea, Bilbo eta Altsasu izan ziren euskal preso politikoen eskubideak erreibindikatzeko aukeratu ziren eszenatokiak.

**99.12.31:** preso kopurua 453 kidekoa da. Aspadiko partez, txikiena.



***Giltzapean eduki bazuten ere, izpiritu librea zen Kromarena. Inolako kartzelak ixten ez duen horietako bat.***

# 2000

**00.01.04:** *Batera* foroa Madrilen aurkeztu zen.

**00.01.06:** Milaka pertsona manifestatu ziren Bilbon Kolektiboaren aberriratzea eskatuz.

**00.01.27:** Euskal preso politikoen elkartasunez, greba orokorra Euskal Herrian. Izugarrizko mobilizazio soziala. Hamarka mila lagun kalean.

**00.02.13:** Ruben Garate otxandioarra hil zen auto istripuan euskal preso politiko bat ikustetik zetorrenean.

**00.02.27:** 63 egun ezer jan gabe eman ondoren, Daniel Dergi euskal preso gose-greba uztea erabaki zuen.

**00.03.11:** Milaka pertsona Baionan presoen aldeko mobilizazioan.

**00.03.29:** PNVk Batera ekimena zapuztu zuen, ura bere errekara eraman eta ETAren jardunaren gaitzespenarekin lotu nahi izateagatik, bere sorrera-printzipioak urratuz.

**00.04.27:** EPPKk eragileak zein jendarte osoa enplazatu zituen beren eskubideen alde hartutako konpromisoak azken bururaino bete zitzaten.



***Ocaña 2ko kideak, patioan. Kolektiboaren gainerako kideekin batera, gose-greba mugagabean parte hartu zuten.***

**00.05.02:** Hilabete batzuk arinago Kolektiboak abiarazitako gose-grebari 131 kide batu zitzaizkion.

**00.05.25:** Presoen aldeko geldialdia: 3.500 enpresetan eragina izan zuen. Bi egun beranduago EPPKk amaitutzat jo zuen azaroan hasitako gose-greba mugagabea.

**00.10.22:** Espetxe funtzionari baten kontrako atentatua Gasteizen. Langraizen zerbitzuburua zen Maximo Casado hilda.

**00.11.29:** Sakabanaketaren kontra, 47 kide borrokan frantziar estatuko espetxe ezberdinetan.

**00.12.31:** Mende berrian, 521 euskal preso politiko zeuden munduko kartzeletan.

# 2001

**01.01.24:** Igor Solana kidea gogor jipoitua Langraizen, ihesa saiakera egin ondoren.

**01.02.03:** Gestorek eta Koordinaketak milaka pertsona bildu zituzten Bilbon euskal preso politikoen eskubideak eskatzeko eta dispertsio politika salatzeko.

**01.02.25:** Presoen senitartekoek gatazkari irtenbide demokratikoa ematea onetsi zuten Senideak-Gureaken Asanblada Nazionalean.



***Igor Solana (irudi honetan Huelvan, kokoriko, ezkerretik hasita bigarrena) jipoitu zuten kartzelariek Langraitzen. Bere "errua": hanka egiten saiatzea.***

**01.04.16:** Txosten mediko batek espainiar kartzeletan euskal preso politikoek pairatzen duten osasun-laguntza eza salatu zuen.

**01.06.09:** Bost mila pertsona manifestatu ziren Pariseko kaleetan frantziar gobernuari presoekiko begirunea galdegiteko.

**01.06.22:** Benjamin Ramos kidea aske, sendaezinezko gaixotasun baten eraginpean.

**01.08.20:** Dueñaseko presoek bertan behera utzi zuten beren gose greba, helburuak erdietsita.

**01.08.08:** Asier Heriz eta Iñaki Saez, Lurdes Txurrukaren euskal preso politikoaren lagunak, kotxe istripuz hil ziren, bera bisitatzera zihoazelarik.

**01.11.05:** AAMren kontra Garzonek abiarazitako operazioan euskal preso politikoen abokatuen sekretu profesionala bera ere bortxatu zen.

**01.12.02:** Etxerat aurkeztu zen Gasteizen.

**01.12.16:** Askatasuna antolakundea Donostiako Kursaal aretoan aurkeztu zen.

**01.12.19:** Sakabanaketa politika zorrozten zen une berean (preso prebentiboak ere dispertsatzen hasi ziren Andaluzia eta Galizara), EPPKren kide kopurua 534koa zen.

# 2002

**02.04.04:** Fleury-Merogiseko kideak mitardera.

**02.04.15:** Iñigo Azkue preso zarauztarra UCIn, kardiopatia larri baten ondorioz.

**02.06.03:** Euskal preso politikoen hurbilketaren alde agertu ziren Pauko Kontseilu Nagusiko hamabi kontseilari.

**02.06.30:** Zigorraren hiru laurdena beteta egon arren, 124 kidek jarraitzen zuten giltzapeturik.

**02.07.08:** Bautista Barandalla ospitalean. Bere askatasuna ukatu zuten, nahiz eta hesteetako gaixotasun batek kinka larrian zeukan. Urte osoan zehar egundoko mobilizazioak egon ziren bere askatasuna exijituz.




***Bautista Barandalla, ospitaleko ohean.***

**02.08.17:** Ismael Berasategi euskal preso politikoak hanka egin zuen La Santé-ko presondegitik, bisita izan ostean anaia bikiaren lekua hartuta.

**02.11.23:** Ramón Gil Ostoaga euskal preso politiko ohiak bere buruaz beste egin zuen Legazpin, aske utzi eta gero berriro espetxeratu nahi zutela jakitean.

**02.12.29:** Kode Penalaren aldaketarekin 30 urtetik 40ra igo nahi zuela kartzela zigor gogorrena aurreratu zuen Aznar presidenteak.

**02.12.31:** Errepresioaren ondorioek handiagotu zuten preso kopurua: urtebetean, ehunda hamasei kide gehiago. Guztira, 650 urte amaieran.

# 2003

**03.01.02:** Del Burgok esan zuen euskal presoak espetxe barruan usteldu beharko luketeela.

**03.01.12:** Baldintzapeko askatasuna eskubidea izateari utzi zion euskal preso politikoentzat, Espainiako Espetxe Zuzendaritzak ukatzen hasi baitzuen.

**03.02.02:** Barandalla Iruñeko Bideko Ama Birjina erietxera eraman zuten berriz ebakuntza egiteko.




***Iñaki Balerdi eta Argi Iturralde izan ziren dispertsioak hildako bi denideak.***

**03.03.01:** Juankar Balerdi kidearen ama eta anaia kotxe itsripuz hil ziren; aita, ordea, oso larri. Sakabanaketaren ondorio latzek goia jo zuten.

**03.03.16:** Herrerako presoak bere borondateran aurka Ciudad Realen erroldatu zituzten.

**03.05.14:** Espetxe Zaintza Entzutegi Nazionalean zentralizatzea bermatu zuen espainiar Kongresuak.

**03.06.28:** Duintasun Testigantzak ekitaldia Belodromon. Bertan, EPPKk prozesu politikoan eta gatazkaren konponbidean bideratzeko ahalegin negoziatuan parte hartzeko eskubidea erreibindikatu zuen.

**03.09.27:** Txapeoa burutu zuten euskal preso politikoek kartzela guztietan. Egun batzuk beranduago, bisitarik gabeko asteburu batean milaka pertsonek babestu zituzten senideak Lasarten antolatutako ekitaldi batean.

**03.10.27:** Auzitegi Nazionalak erretroaktiboki aplikatu nahi zuen Kode Penal berria euskal preso politikoen zigorrak luzatzeko.

**03.11.29:** Iñaki Etxeberria presoaren laguna zen Sara Fernandez iruindarra auto istripu batean hil zen. Ezbehar berean Izaskun Urkijo larri suertatu zen.

**03.12.21:** *Hausnarketa Nazionala* izeneko gogoeta kolektiboaren emaitzak aurkeztu zituen Donostian Amnistiaren aldeko Mugimenduak.

**03.12.31:** 681 euskal preso politiko estatu ezberdinetako 86 presondegitan

# 2004




**Grebalariak Bartzelonan.**

**04.01.04:** Etxeraten eskutik Europa osora zabaldu ziren, tokian tokiko gose greben bitartez, euskal preso politikoen eskubideen urraketa eta haiekiko elkartasuna.

**04.03.07:** Julen Atxurra euskal preso politikoak 36 egun zeramatzan gose greban Rouengo espetxean. Hamar egun beranduago amaitu zuen protestaldia.

**04.04.13:** Albaceten preso ziren kideek beren eskubideen alde abiatu zuten gose




***Nazioarteko Elkartasunezko Konferentziak aztertu zituen munduan diren preso politikoen dinamika zein eskubideak maiatzan burutu ziren ihardunaldietan.***

greba hasi zenetik hilabate bat pasatuta zegoen. Handik hiru egunetara utzi zuten.

**04.04.23:** Euskal Herritik urrunen ziren bi presondegietara (Algeciras eta Bapaume) bertaratu ziren ehunka herritar, elkartasuna adieraztera.

**04.04.26:** Kepa Miner, euskal preso politiko ohia, Hernanin hil zen, espetxean gaizki zaindutako gaixotasun baten ondorioz.

**04.05.20:** Preso Politikoen Nazioarteko Konferentzia hasi zen Donostiako Miramar jauregian. Hamarka herri ordezkatuta, elkartasuna egituratzera eta prozesu politikoetan parte hartzera egin zuen gonbidapena EPPKk.

**04.06.04:** Leo Esteban senidea urte batzuk lehenago anaia bisitatzera zihoala izan zuen kotxe istripuan izandako kalte fisikoen ondorioz zendu zen Tolosan.

**04.06.18:** Anjel Pikabea euskal preso hernaniarrak hilabete bat zeraman gose greban Perpinyà-ko kartzelan. Orotara, 41 egun eman zituen jan gabe.

**04.07.08:** Oihane Errazkin hilda agertu zen Fleury-ko bere ziegan.

**04.08.18:** Gose greban zeuden Palestinako preso politikoei elkartasuna adierazi zien EPPKk agiri bat zela medio.

**04.09.10:** Urtean zehar 35 istripu larri jasan zituztela salatu zuen Etxeratek agerraldi publiko batean.

**04.10.06:** Bi euskal preso politiko labanaz zaurituta Almeriako kartzelan.

**04.11.19:** Filipe Bidarten askatasuna ukatua Parisen.

**04.12.06:** Karmele Solaguren, Ekain Guerra presoaren ama kotxe batek harrapatuta hil zen kartzelako bidean. Aita larri zaurituta.

**04.12.31:** EPPKk bere eskubideen aldeko mobilizazio sorta berria iragarri zuen agiri batez. Kolektiboak 714 kide zituen orduko.

# 2005

**05.01.03:** Espetxe guztietan hamar minutuko plantoak egin zituzten euskal preso politikoek. Borroka dinamika iraunkorraren lehen urratsetako bat izan zen eta txandakako txapeoak izan ziren hurrengo pausua.

**05.01.03:** Hamarka mila pertsona Bilboko kaleetan, EPPKren erreibindikazioekin zein gatazkaren konponketarekin bat eginez.

**05.01.21:** Erredentzioak eskuratu ahal izateko irizpideak eta aukerak kartzelarien esku.

**05.02.18:** EPPKk europar Konstituzioari ezetz bozkatzeko deialdia kaleratu zuen.

**05.03.14:** Euskal preso politikoak gose greba mugagabean. Parisi zein Madrileri espetxe politika aldatu eta gatazkaren konpontze klabean jar dezaten galdegin ziotelarik. Hilaren 26ra arte luzatu zen gose greba.

**05.04.26:** Unai Parot kartzelan 60 urte eman ditzan lehen ebazpen judiziala eman zen jakitera Auzitegi Nazionalean.




***Milaka lagun hurbildu ziren Zornotzara Gatza eta EPPK omentzera.***

**05.06.01:** Irantzu Abad, euskal preso politiko baten neska-laguna, oso larri zaurituta epaiketa egin ondoren izandako kotxe istripu batean.

**05.07.09:** Jose Mari Sagardui Gatza-k 25 urte giltzapean eman zituela eta, omenaldi jendetsua Zornotzan.

**05.08.22:** Etxeratek salatu zuen espainiar gobernuak bizi arteko zigorra ezartzeko urratsak ematen hasia zegoela. Astebete beranduxeago ikasteagatik lortutako zigor-luditzeak errebisatzeko agindua eman zuen fiskalak.

**05.10.31:** Jose Angel Altzuguren Kotto, hilda agertu zen bere ziegan, Soriako kartzelan.

**05.11.25:** Beste urte batez euskal presoek EHUn ikasketak egiteko aukera zapuztuta jarraituko zutela salatu zuten milaka pertsonak Euskal Herrian.

**05.12.01:** Ia hogeita hamar eragile biltzen zituen Ibaetako Foroak EPPKk prozesuan parte hartzea aldarrikatu zuen.

**05.12.31:** Ibaetako Foroak babesa jaso zuen nonahi. Urte amaieran, 664 kide zituen Kolektiboak.

# 2006

**06.01.07:** Ibaetako Foroak deiturik, 41.000 lagun manifestatu ziren Bilboko kaleetan, beren eskubide guztien jabe aberriratu zitzaten eskatuz.

**06.02.08:** Presoak ez kaleratzeko maniobra politikoak. Lopez Aguilarrek inputazio berriak sortzeko asmoa azaldu zuen, eta Grande-Marlaska epaileak berriro auzipetu zuen Parot.

**06.02.27:** Igor Angulo urkatuta topatu zuten bere ziega barruan, Cuencako espetxean.

**06.03.03:** Roberto Sainz kidea bihotzekoak jota zendu zen Aranjuezen, nahiz eta aspaldi kexu zegoen bularreko mina zuela.

**06.03.09:** Greba eta mobilizazio eguna Euskal Herrian sakabanaketa salatu eta konponbide demokratikoa aldarrikatzeko. Izugarrizko eragina izan zuen.

**06.03.18:** Erasoak eraso, konponbidearen alde borrokan jarraituko zuela esan zuen EPPKk.

**06.04.15:** EPPKk Oinarrizko Hitzarmen Demokratikorako hausnarketetan parte hartu zuen, gainerako eragileekin batera bake eta demokrazia eszenatoki bat bilatze aldera.




**06.08.05:** Iñaki de Juanari ezarri nahi zitzaion bizi arteko zigor izkutua salatzeko, gose greban jarri zen euskal preso politikoa.

**06.10.07:** Milaka pertsona Donostian, presoen eskubideen alde eta de Juana kaleratzea exijituz. Bitartean, 62 egun zeramatzan gose greban preso donostiarrak.

**06.10.18:** Estatus politikoa eta amnistiaren aldeko gose greba abiatu zuten Kolektiboaren kideek.

**06.11.07:** Iñaki de Juana berriro gose greban, bi iritzi artikulu idazteagatik 12 urteko zigorra eskatzen zutela jakiterakoan.

**06.12.12:** Gaixorik diren eta zigorra beteta duten euskal presoen aldeko dinamika ibiltaria Euskal Herrian. Eskualdeetan, ehunka herritar gose greban. De Juana indarrez elikatuta ospitalean.

**06.12.31:** Urtea amaitzeko, presoak gogoan. Amnistia da gatazka gainditzeko bide demokratikoa. Kolektiboak 595 kide zeuzkan.



*Iñaki de Juana ospitalean zegoela egin zitzaizkion argazki batean.*

## 2007

**07.02.01:** Filipe Bidarti eman zioten baldintzapeko askatasuna. Hilaren 13an askatu zuten.

**07.02.05:** "The Times" egunkari britaniarrak de Juanaren argazki bat eman zuen argitara, eskuak eta oinak ohera lotuta. EPPKk autodeterminazio eskubidea eta amnistiaren aldeko borrokaldi berriari eman zion bide.

**07.02.18:** Komunikazio greba abiarazi zuen EPPKk. Amnistia eta autodeterminazioaren aldeko manifestazioa deitu zuen Bilbon.

**07.02.24:** Ertzaintzak hamarka pertsona zauritu zituen Bilbon, EPPKk deituriko martxaren kontra kargatzerakoan.

**07.02.28:** De Juana hilzorian, 114 egun gose greban, 55 kilo pisatzen zuen. Hurrengo egunean Euskal Herrira eraman zuten, eta bertan behera utzi zuen protestaldia.

**07.05.03:** Bi euskal preso politikok bere buruaz beste egiten saiatu zirela salatu zuen Askatasunak.

**07.07.04:** Jose Maria Sagardui Gatza, 27 urte kartzelan.




**07.09.09:** Lakuak debekatu ondoren, zauritu eta atxilotu andana Donostian, estropadak eta gero urtetan zehar egin den presoen aldeko manifestazioa indarrez desegin baitzuen Ertzaintzak.

**07.11.02:** Iñaki Bilbao gose eta egarri greban Puerto 3an. Ospitalera eraman behar izan zuten.

**07.11.17:** Zigorra beteta daukaten 170 presok kartzelan jarraitzen zuten.

**07.12.25:** Natividad Junko, euskal preso politiko baten amaginarreba, istripuz hil zen bisitara joaten ari zenean.

**07.12.31:** Inoiz egon den preso kopururik handiena: 709 kide zituen Kolektiboak 92 espetxetan.

Frankismoaren urte ilunetan, garaiko euskal preso politikoek mezu garbia bidali zioten PNVri: geure egoera jakitera emateko, espetxeetan errejimenak egiten duena eta, bidenabar, euskal biztanlegoak pairatzen duen errepresio politikoa mundu zabalean ezagutu dadin, preso politikoen aldeko nazioarteko konferentzia bat antolatu beharra dago.

1955. urtea zen, eta PNVk lagun berriak zituen nazioarteko esparruan, yankiak, alegia. Parisen zen antolatzekoa aipatu konferentzia, baina arazoak eta ezina tarteko, edo, ziurrenik, AEBko lagunen iradokizunen ondorioz, sekula ez zen eman kartzeletatik eskatutako urratsa. Alderdi jeltzalearen enegarren porrotaren erakusle, mende erdi bat beranduago mamitu zen orduko egitasmoa. Amnistiaren aldeko Mugimenduak antolatuta, Donostiako Miramar Jauregian lau egunez luzatu zen mundu osoko preso politikoak aztergai eta hausnargai zituen nazioarteko konferentzia burutu zen. Bertantxe, EPPKren ekarpena nabarmentzekoa izan zen.

## **Konferentziaren** *edukien ardatzak*

### Gatazken ezaugarritzea eta giza eskubideak

Giza eskubideen inguruko eztabaida kutsatuta egoten da sarri. Izan ere, bere definizio burgesak bihurritzen du oinarrizkotzat ditugun eskubideen definizioa eta, batez ere, gauzatzea. *Zer dira giza eskubideak?* Galdera klabea zen gatazka eta beronen ondorioez doi hitz egin ahal izateko.

Giza eskubideen bortxaketa -giza eskubide zibil eta politiko, gizabanakoak edo kolektiboak- gatazken oinarrian direla jakinik, gatazka politikoen muinera iritsi eta errebeliorako eskubidea argudiatzea lan errazagoa zen, aldez aurretik kutsatu eta norabaide okerreko eztabaida gehienetan marrazterik ez dagoen norabidea erakustearren.

### Presoen izaera politikoa

Gatazkaren oinarri politikotik preso politikoen izakerara pasatzea zen Konferentziaren beste helburu bat. Izan ere, preso politikoa ez dira kosmosaren erdian espontaneoki agertzen diren pertsona multzo -eta are gutxiago gaizkile multzo- arraroak, baizik eta gatazka politikoaren ondorioak.

Hortaz, preso politikoaren statusak zer garrantzia duen frogatzeko, mundu zabaleko eskarmentua aintzat hartuta, gerra presoen errekonozimendu zehatza nola uler daitekeen aztertzea bilatu




***Lan-batzorde baten emaitzen aktaren aurkezpena.***

zen, Euskal Preso Politikoen Kolektiboak ekarri zuen ideia ariete modura erabilita. Azken batean, espetxe baldintzen egokitzea eta interlokuzio politikorako ahalmena zein eskubidea ziren hausnarketa horren ardatz nagusiak. Estatusa errekonozitzea bai, politikoki parte ahal izateko. Eta hori bideragarri izan dadin, bizi baldintzen txukuntzea.

## Gatazken konponbidea eta preso politikoen aportazioa

Behin gatazka egoerak definituta, gatazkaren parte eta ajente eragilea diren neurrian, preso politikoen aportatzioa zertu eta azpimarratzea zen Konferentziaren bigarren xedea. Zehazkiago, konsigna dimentsiotik aise haratago, zer nolako esanahia duen AMNISTIA kontzeptuak eskubideen berme lanetan eta gatazkaren beraren gainditze demokratikoan.

## Diskurtso horren sozializazioa: elkartasuna eta hedabideak

Gatazkaren beroan sortuak, preso politikoen jardute eta eragite ahalmena kartzelatik garatu eta, azkenik, bere izaera politikoaren inplikazioa jendarteratzea ziren helburu nagusiak. Naziorteko elkartasuna eta herri barneko elkartasuna dira, eskema honetan, egundoko garrantzia daukaten gakoak. Sozializazioren zereginak elkartasun desinteresatu eta bidirekzional horretan sustatzen direlakoan, beronen definizioa eta tipologia ondo finkatzea Konferentziaren beste erronka bat zen.




***Michael Culbert irlandarra, IRako preso ohia eta COISTEko ordezkaria, atriletik hitz eginez.***

Horrekin lotura zuzena duen komunikazioa eta hedabideen tratamendua ere jomugan egon ziren, preso politikoekiko ikusmoldea hedabideek ematen duten tratamenduaren araberakoa izaten baita. Amaitzeko, elkartasun eraginkor bat kudeatzeko komunikazioa hobetzea premiazkoa zaigunez, zein tresnak behar diren pentsatu eta sortzeko baliatu nahi genuen Konferentzia. Begibistakoa da Nazioarteko Konferentziarako helburuen nolakotasuna: kateen pisuari kasu egin gabe, preso politikoen ekarpen ahalmenari bozgoragailua jarri eta beren izaera zein borondatea dagozkien tokian jartzea. PNVk 1955an egin ez zuena, geuk egin genuen 2004ko maiatzaren 20-23a bitartean.

## **Nor,** *nori, zerk*

Egun haietan zehar, askotarikoak izan ziren mintegi ezberdinen bidez, pasillo lanetan edota bestelako aukeratan, jaso ziren testigantza eta egoerak, baita sortutako aliantzak ere. Hasteko eta behin, 27 herri ezberdinetatik ordezkaritza zabala etorri zela esan behar da, gutxitan, oso gutxitan elkartu baitira horrenbeste pertsona, munduko preso politikoen arnasa sostengatzen duen hainbeste jende, preso politikoei buruz mintzatzeko. Beraiekin, preso politikoekin egin genuen Konferentzia, eta hori itzeleko lorpena izan zen.

Argentina, Txile, Iran, Alemania, Frantzia, Paisös Catalans, Tamil Herria, Hego Afrika, Irlanda, Palestina, Galiza, Portugal, Turkia, Italia, Belgika, Puerto Rico, Breizh, Kolonbia, Sahara, Peru, Mexiko, Maputxe Herria, Corsica, Austria, Espainia, Estatu Batuak eta Kurdistan. Euskal Herriarekin batera, preso politikoak dauzkaten edota euren elkartasunez diharduten antolakundeak dituzten herri horiek guztiak Donostian egon ziren, eta Kontxako badiak eskaintzen zuen bista ederrarekin begirada bareturik lagundu gintuzten Konferentzia egiten.

Ekimen hura bideragarri izatea lortu zuten boluntarioen lana txalotu beharko genuke: antolaketan, seguritate nahiz itzulpen lanetan, bazkariak prestatzen, edota beste arduretan, hamarka boluntarioen lan izugarriak lortu zuen Nazioarteko Elkartasunezko Konferentziaren gauzatzea.

Lagun hauek bideragarri egin zuten Konferentzian, askotarikoak izan ziren jorratu genituen gaiak zein harremanak, betiere nabarmentzekoa izan zen kidetasun txalogarrian. Entzuteko parada hartu, besteen bizitza eta ikuspuntuak aztertu eta gureak mahai gainean jarriaz, eztabaida interesgarriak eman ziren. Gai asko, eztabaida biziak baina partaideak batu zituen elkartasunezko soka, espetxe barrurartekoa izan zen.

Espetxe barruko lagunak gurekin egon ziren, presente egon ziren modu askotan. Mintzakidetza berria bertan eman zen ezagutzera eta EPPKk delegazio guztiak agurtu zituen sarrerako ekitaldian, jarraian irakur daitekeen mezuarekin:




***konferentzian parte hartu zuten delegazioen talde-argazkia.***

> *Gure agurrik beroena helerazten dizuegu Donostiara, Euskal Herrira, hurbildu zareten guztiei. Lehenik eta behin, ongi etorriak!!*
>
> *Euskal Herriko Amnistiaren Aldeko Mugimenduak antolatu du Nazioarteko Elkartasun Konferentzia. Ekimen honen bitartez bai guri, bai mundu zabalean diren preso politikoei, aukera ematen diguzue gure ahotsak entzun daitezen. Halaber, preso politikoon sostenguan lan egiten duen ororena entzuteko aukera.*
>
> *Justizia eta demokraziaren alde borrokatzeagatik izaten gara espetxeratuak. Zapalkuntza politiko eta sozialaren kontra matxinatzen garelako expetxeratzen gaituzte. Ez gara beste planetakoak. Gure herri eta gizarteen askatasun egarriari erabakiortasunez erantzuten diogunak baizik. Herritarrak gara. Herriarenak. Eta herri mugimendutik hartzen dugu indar aurrera egiteko. Gurea herriaren bizi-borroka da eta.*
>
> *Miramar Jauregira bildu zaretenak oro har preso politikoen alde jarduten duzue. Sarri preso politiko ohiak ere bazarete. Herrialde zein errealitate anitzetako presoekiko elkartasuna lantzen duzue. Areago, Nazioarteko Elkartasun Konferentzia honetan parte hartuz, preso politikoen beraien arteko elkartasunari ere bide berri eta zabal bat irekitzen diozuela ez dugu zalantzarik. Gure esker ona helerazten dizuegu, beraz, eta era berean animatzen zaituztegu presoen aldeko lan amankomunean jo eta ke segi dezazuen. Ezibestekoa baitzaigu elkartasuna egituratzea, geureari eutsiko badiogu.*
>
> *Euskal Herrian abegi on eta jardunaldi oparoak izan ditzazuen espero dugu, desiratzen dugu, eta zeuen herrialdetara itzulitakoan zabal ezazue gure errealitatearen berri. Batez ere, zuek sostengatzen dituzuen preso politiko guztiei helerazi euskal preso politikoen besarkadarik beroen, iraultzaileen eta anaikorrena.*
>
> *GORA PRESO POLITIKOAK MUNDUAN!!*
> *AMNISTIA ETA ASKATASUNA!!*

Konferentziaren hasieran esan bezala, preso eta iheslari politikoen aldeko elkartasun esparruak bideratu nahi genituen, eta hori izan zen Nazioarteko Elkartasunezko Konferentziaren helburuetako bat. Eragile politikoak direla genion eta eragiletza eta jite horren alde egin zuen Konferentziak. Aurrera begirako lan tresnak ere sortuak izan ziren, etorkizun hurbilean tresna eraginkorrak izate aldera, preso politikoen existentzia, beraien eragintza eta agente politiko horrek behar duen ezagutza azpimarratzeko.

# **Donostiako** *ebazpena*

Tailerretan atera ziren ideia guztiak findu eta sintesi modura laburbilduta, Konferentziaren azken eguna "Donostiako ebazpena" deitu genuen dekalogo hau lau haizetara zabaldu zen, non landutako kontzeptu, ideia eta ondorioak laburbildu ziren. Lau kontinentetako ordezkariek sinatu izanak orain arte ezagutu den zedarririk gorena dela esan daiteke batere lotsik gabe; edo beste era batera esanda, nazioarteko esparruan borroka klabean diharduten hainbeste ordezkari prestijiodunek izenpetzeak berbiziko garrantzia dauka Euskal Herriarentzat. Nork dio isolatuta gaudela munduan barrena?

**1.** Preso politikoen izaera estuki lotzen zaio gatazkari, haiek eratorriak diren borroka prozesuari, alegia. Borroka prozesuetan parte hartu izanaren ondoriozkoak dira. Baita ere borrokatzen duten sistemen jarduera errepresiboaren ondoriozkoak. Beren izaera politikoa ukaezina da, beraz.

**2.** Espetxea bada borroka gunea. Bertan, identitate propioa bereganatuz, presoak kolektibo gisa antolatzen dira. Presoen biziraupenerako Kolektibo baten osatzea ezinbestekoa da. Are gehiago, presoak eratorriak diren prozesu sozial eta politikoetan parte hartzeko tresna ere bada, eragintza politikorako bidea hain zuzen.

**3.** Eraldatze politiko eta sozialetan, borroka prozesuetan, eta gatazken gainditze bidean presoen partehartzea ezinbestekoa da. Partehartze hori prozesu horien arrakastaren bermea baita.

**4.** Preso politikoak dituzten Nazio-estatuek ezin dute haien esistentzia onartu, beraiek sortu duten gatazkaren ondoriozkoak baitira. Horregatik ahalegin guztia egingo dute errealitate hori ukatzeko. Legealdi antiterrorista zein espetxe politika dira helburu horretarako diseinatutako bi tresna.

**5.** Preso politikoei izaera politikoa ukatzen zaien bitartean, egokitu eta inposatzen zaien trataera bereziak azpimarratzen du beraien natura, izaera eta jatorria. Espetxe politikaren helburua, ordea, preso politikoen erreferentzialitatearekin amaitzea da.

**6.** "Terrorismoa"-ren aurkako borrokaren izenean, inperialismoaren aliatu diren Nazio-estatuek, beraien jarrera bortxatzailea nagusituz, Demokrazia eta Giza eskubideen defendatzaile sutsuak direla irudikatuz, bortizki ukatzen dute Preso politikoen izaera eta prozesuan parte hartzeko aukera.

**7.** Gatazka enfrentamendu bortitzaren parametroetan kokatzen den bitartean, Nazio-estatuek gatibutzat hartzen dituzte preso politikoak. Beraien helburua honako hau da: presoari zein bere inguruari sufrimendua sortaraztea; haren bitartez, herriak aurrera eramaten duen borroka baldintzatzea eta ahal bada neutralizatzea.

**8.** Presoen askatasunak zein iheslarien itzulerak gatazka politikoa enfrentamendu bortitzaren parametroetatik bortxarik gabeko eszenatokira eramaten lagun lezakete, baldin eta gatazkaren sustraietara jo eta berau gainditze bidean jarriko balitz. Amnistia Osoa gauzatzeko aukera zabalduko litzateke, izan ere, gatazkak jatorri dituen arazoak konponbidean jarriz gero. Beraz, gatazkaren ondorioz errepresaliatu izaera izan duten herritar guztiek ez lukete egoera hori berriro pairatzeko arrazoirik topatuko.

**9.** Preso politikoekiko elkartasunak ez dio uko egin behar presoen jatorri politikoari. Elkartasuna parametro politikoetan egituratu behar da, elkartasun humanitarioa baztertu gabe, beti ere elkartasunaren muinean ildo politikoa izan beharko da.

**10.** Ebazpen hau, Konferentzia honetan lan egin dugun guztiok gure herrietan zabaltzeko konpromisoa hartzen dugu. Honekin batera, hemen sortu den dinamikarekin bat eginez, lan ildo honi jarraipena emateko ardura hartzen dugu.

Hauxe ez zen emaitza bakarra izan. Ebazpena onartu ondoren, ekarpenak eta proposamenak aztertu eta bozkatu ziren, eta horien artean Preso Politikoen Nazioarteko Eguna apirilaren 17an ezartzea erabaki zen, palestindar delegazioak proposaturik. Bestaldetik, munduan zehar borrokatzeagatik preso dauden milaka emakume eta gizonek borroka eta konpromisoaren bidea kartzeletatik erakusten diguten bitartean, elkartasunezko antolakundeen arteko elkarlanerako tresna berri bat jartzea baietsi zen: www.kalera.org  web orria.

Dena dela, Euskal Herrian egonda, ezinezkoa zen kaleari bizkar ematea. Halako mintegiek kutsu hertsia hartzen dute sarri. Esan nahi dugu, eztabaida potolo zein, batzutan, korapilatsuen askatze bidea gela eta agertoki itxien markoan egiten dela, eta jendartearen parte hartzea mugatua agertzen da. Donostian ez genuen oso Konferentzia ezberdina egin, baina egitarauak aukera irekiak eskaini zituen. Hala nola, antolatzaileek Usurbilen musika kontzertu bat egiteaz gainera, Xabier Oregi *Panti*  preso izandakoaren ongi etorrian egon ziren delagazioak, ehunka bergarrarrekin batera; amnistiaren aldeko asteak ospatu ziren herri askotan, eta, Konferentziaren azken egunean nazio manifestazioa egin zen Donostiako Bulebarretik, non milaka lagun elkartu ginen.

Arratsaldean herri-bazkaria egin zen Antiguako frontoian, eta bertan, besteak beste, Ralf Heissler alemaniarrak hartu zuen hitza. RAF-eko preso politiko ohi horrek 27 urte eman zituen kartzelan. Berriki kaleratua, malkoak ezin izan zituen eutsi bildutako jendeari bere presentzia eskertzean. Emozioak eta pasadizoek aztarna ugari izan zituzten; batzuk bistakoak, beste batzuk, ordea, hartu-eman ugariren arlo pribatuan: Aritxulegira egindako bidaia, Hego Afrikako delegatuen bizkortasuna, Chileko Movimiento Patriótico Manuel Rodriguez antolakundeak EPPKri helarazi zion domina, Kurdistango ordezkariarekin elkar ulertzeko itzultzaileen arazoak, antolatzaileen ezinak eta ekinak,...

Joxean Pagola, Hernaniko preso ohia eta Nazioarteko Konferentziaren bozeramaileak elkarrizketa batean nabarmendu zuenez, "euskal presoak ahotsa izan dezaten tresneria sortzea" zen




helburua, eta bide horretan beste herrialdetako jendearekin esperientziak eta ekarpenak trukatzea interesgarria ez ezik, ezinbestekoa ere bazen. Ildo beretik, gatazkaren ondorio ere badiren iheslariek hala-nolako engaiamendurik erakutsi zuten Konferentziarekin, fisikoki bertan egon ez, baina Uztaritzen antolatu zuten ekitaldia medio, txosten bat prestatu zuten Kolonbiako, Txileko eta Puerto Rico-ko iheslarien izenean bertaratu ziren nazioarteko ordezkariekin batera. Iheslarien kolektiboak ezin zezakeen parte hartu Donostiako mahai-inguruetan, baina garbi frogatu zuen zapalkuntzak ez duela mugatzen bere grina eta borroka deliberamendua.

Hondarrik uzten duten gertakari guztiek inprimategitik pasatu behar dutela dioen topiko moduko bat badago gure artean. Egia esateko, liburudendeetako apalategitik jendearen eskuetara sekula iristen ez diren liburu askotxo editatzen dira geurean, baina salbuespenik badago.

Konferentzia amaitu eta hilabete gutxitara, Durangoko Azokan eskuragarri zegoen Kalera izeneko liburua. Amnistiaren aldeko Mugimenduak tarrapataka egin eta maketatu ostean, ehunka lagunek eraman zuten etxera, DVD bat eta guzti. Nazioarteko elkartrukatze hark Euskal Herrian eta munduko borrokalari guztien bidaiari-maletan utzi eta eraman zuena lasai aztertu eta tamainan baloratzekoa baita. "Zein txikia den Euskal Herria, eta zer eragite indarra dugun" esan zuena ezagutzen dugu.

Nazioarteko Konferentziaren itzala deskribatzeko, egun berriro kartzelan dagoen Mikel Egibar antiguatarraren gogoeta patxadatsua berreskuratzeari egoki deritzogu. Izan ere, liburu hau




eskuartean zuela, zera esan zuen: "Hau bezalako materialak, euskara oinarri eta Euskal Herria anfitrioi, egundoko balioa dauka. Inoiz ez da holakorik egin, eta are gutxiago idatziz jaso, munduko preso politikoen egoera, eskubide, eskuartze eta zeregin politikoei buruz. Pozik egoteko moduko lana egin da."

Eta halaxe izan da. PNVk 1955an ez, baina Euskal Herriak egin zuen ia mende erdia beranduxeago. Ezina ekinez egina.



*Liburu honek gure historiaren alde izkutuenetako bat kontatzen du. Estatu espainol eta frantsesak eraikitako kartzeletan milaka euskal herritarren jardunaz beteta daude bere orrialdeak. Batik bat, Franco hil eta ondorengo marko sasidemokratikoa gainditu nahian borrokaren hautua egin eta espetxeratu duten pertsonen ibilbidea, grina eta testigantza eskaintzen dizkigu. 1936ko gerra hasi zenez geroztik, bi aste besterik ez dira izan euskal preso politikorik gabekoak. Fran Aldanondo askatu eta Xan Marguirault giltzapetu zuten arteko aldia, alegia. 1977ko abenduan izan zen, eta itxaropentsu bizi eta tinko jarduten zuen gure Herriari ukazioaren eta errepresioaren aukera baino ez zioten eman aurrerantzean. Borrokaren bidea halabeharrez hartu zituzten milaka pertsona kartzelaratuak izan dira orduz geroztik. Bost mila baino gehiago dagoeneko. Espetxe barruko beren antolamendua, kezkak, gogoetak eta, edozeren gainetik, konpromiso testigantzak jasotzen ditu liburuak. Arnasa gure memorian, aurrera egiteko ezinbesteko eskarmentua, burdinak hautsiz eskuratuko baitugu askatasuna.*